

ALDOUS HUXLEY (1894-1963) mende honetako idazle ingeles garrantzitsuenetakoa da. Kultura-tradizio handiko familia batean sortua, Oxforden ikasi zuen medikuntza, baina ez zen lanbide horretan aritu begietako gaitz batek ia itsu utzi baitzuen. Europako kontinentean zehar ibili zen garai batean eta 1937an Kalifornian finkatu zen betiko.
*Bai mundu berria* (1932) du eleberririk ezagunena baina liburu ugari idatzi zuen, hala nola *Crome Yellow* (1921) edo *Point Counter Point* (1928)

Liburu honek Eusko Jaurlaritzako Kultura Sailaren laguntza jaso du.

Liburu hau 1971n plazaratu zen lehenengoz, orduko Lur argitaletxeko Kriselu sortako 19. alean, Xabier Amurizaren itzulpenaz. Itzulpenaren gaurkotze eta gainbegiratzea Joanes Urkixok egin du.

Bildumaren diseinua: J. Felix IGARTUA / Pilar LITAGO
Azaleko irudia: G. SEGAL

Jatorrizko izenburua: BRAVE NEW WORLD

(Ingelesezko izenburuak Shakespeareren esaldi bat gogorarazten duen bezala, euskarazkoak Iparragirreren bertso ezagunen oihartzuna dakarkigu. Ugari dira liburuan zehar Shakespeareren aipuak. Letra etzanez edo kakotx artean doaz.)



L.G. NA-743/1994
ISBN 84-7917-419-6

ELKAR S.L. Argitaletxea
Igarabidea, 88 bis
Tel. 310267 - Fax 310216
20009 Donostia

Pannecau, 52 - Tel. 59254390
64100 Baiona

Inprimatzailea: Gráficas Lizarra, S.L., Tafallarako bidea 1. km - LIZARRA (Nafarroa)

# BAI MUNDU BERRIA

ALDOUS HUXLEY

ITZULTZAILEA:

XABIER AMURIZA

ELKAR

# BAI MUNDU BERRIA

*Les utopies apparaissent comme bien plus réalisables qu'ont ne le croyait autrefois. Et nous nous trouvons actuellement devant une question bien autrement angoissante: Comment éviter leur réalisation définitive?... Les utopies sont réalisables. La vie marche vers les utopies. Et peut-être un siècle nouveau commence-t-il, un siècle où les intellectuels et la classe cultivée rêveront aux moyens d'éviter les utopies et de retourner à une société non utopique, moins "parfaite" et plus libre.*

*NICOLAS BERDIAEFF*

—Eta hau —esan zuen zuzendariak atea irekitzean— Ernaltze Gela da.

Inkubatze eta Egokitze Zuzendaria hara sartzean, hirurehun ernaltzaile ari ziren lanean, makur beren tresnen gainean, arnasa ere oztaz hartzerainoko isiltasunean, arretarik arretatsuenez nork bereari ziri-zara ekinez. Mutiko berri pila bat, ikasle ile-hori eta bizarmotzak, orpoz orpo zihoazkion atzetik zuzendariari, urduri denak, edo hobeki esateko, doilorki. Nork bere koadernoa zeraman, zeinetan zirriborratzen baitzuen gizon handi hark ziotsena. Zientziaren beraren iturritik hara edaten zuten jakinduria. Pribilegio aparta benetan. Londresko Zentraleko I.E.Z.k bere egitekotzat zeukan ikasle berriei personalki laguntzea gelarik gela.

—Ideia orokor bat emateko bakarrik —esan ohi zien.

Ideia orokor bat eduki ere behar, zentzuz egingo bazuten lan. Ez zuten, ordea, ideia gehiegirik behar gizarteko atal on eta zoriontsu izango baziren. Zeren xehetasunak baitira, izan ere, mundu guztiak dakienez, bertutearen eta zorionaren ekarle; orokortasunak, ordea, intelektualki begiratuz, derrigorreko okerrak ditugu. Ez dira filosofoak, baizik marketerian ari direnak eta seilu-bildumariak gizarteko bizkarrezurra osatzen dutenak.

—Bihar —gaineratu zuen irribarrez, halako alaitasun mehatxuzkoa zeriola— serioki hasi beharko duzue lanean. Orokortasunak alde batera utzi beharko dituzue. Bitartean…

Bitartean halako pribilegio aparta aprobetxatu beharra zegoen. Zientziaren iturritik koadernora zuzen-zuzen. Eta mutilek zirri eta borro ziharduten eroen gisa.

Altua, argala, baina ardatza bezain tentea, zuzendaria salan barrena abiatu zen. Kokots luzea zuen, hortzak sen-

doak eta pixka bat irtenak, ezpain gizenez eta biribilez estaliak, mintzo ez zenean. Zaharra? Gaztea? Hogeita hamar? Berrogei? Berrogeita bost? Nekez antzeman zekiokeen. Gainera bost axola zitzaion hura inori, Ford-en Aroko 632.ean inori ez zitzaion bururatzen ere horrelako galderarik.

—Hasieratik hasiko natzaizue —esan zuen zuzendariak.

Eta ikaslerik finenek koadernoan idatzi zuten haren asmoa: «Hasieratik hasi».

—Hauek —seinalatu zien eskuaz— inkubagailuak dira. —Eta ate isolatzaile bat irekirik, entseiu tutuen erreskada batzuk, elkarren gain jarriak, erakutsi zizkien—. Hona obuloen asteroko hornialdia —azaldu zuen— odolaren tenperaturan kontserbatuak; gameto arrak, ordea —eta beste ate bat ireki zuen—, hogeita hamabostera kontserbatu behar dira, eta ez hogeita hamazazpira. Odolaren tenperatura normala agorrarazle da.

Termogenoz bilduriko ahariek ez dute arkumerik ernalarazten.

Inkubagailuen gainera kokaturik —lapitzek egundoko zirriborroak egiten zihardutela orrietan behera— ernal prozedura modernoaren deskripzio labur-labur bat egin zuen. Lehenengo, jakina, bere hitzaurre kirurgikoez mintzatu zen: «gizartearen onerako nork bere gogoz jasaniko operazioa, eta gainera sari on bat sei hileko irabazien parekoa». Gero kontatzen jarraitu zuen zer prozedimenduz kontserba daitekeen obarioa bizirik eta desarroilu osoan. Luze ihardun zuen bizi girorik onenak honelako tenperatura, horrelako gazi gradoa eta halako likintasuna behar duela azalduz; eta azkenez likore bat aipatu zuen, obulo umatuak aparte kontserbatzekoa. Lanerako mahaien au-

rrera eraman zituen gero eta erakutsi zien nola ateratzen den likore hura entseiu tutuetatik, nola isurtzen den tantaka, aurretik apropos beroturiko mikroskopio laminetan; nola kontu hartzen zaien hango obuloei, inolako gora-beherarik gerta ez dadin, nola ontzi porotsu batera aldatzen diren, nola (eta oraingoan operazioa bera ikusarazi zien) sartzen den ontzi hau espermatozoo libreak dituen salda epel batean —zentimetro kubikoko ehun mila gutxienez, ekin zion—; eta nola hamargarren minutuan ateratzen den ontzia saldartetik eta ikertzen berriro ontzi barrukoa; nola obulorik ernaltzeke geratuko balitz, bigarrenez murgilarazten den, bai eta hirugarrenez ere, beharrezko denean. Nola obulo ernalduak itzuli ohi diren inkubagailuetara; nola hauetan egoten diren Alfak eta Betak definitiboki botilatuak izan arte; nola, ordea, Gammak, Deltak eta Epsilonak atereak ohi diren hogeita hamasei orduren buruan, Bokanowskyren metodoa ezarteko.

—Bokanowskyren metodoa —esan zuen berriro zuzendariak.

Eta ikasleek beren koadernoetan azpimarratu zituzten hitz hauek.

Obulo bat, enbrioi bat, adulto bat: horra zer normala. Baina hona orain obulo Bokanowskytua berrerne, ugaldu, zatikatu egiten dela; eta larogeitik larogeita hamaseira kimu sortzen dira horrela. Kimu bakoitza enbrioi perfekto bilakatuko da, eta enbrioi bakoitza adulto normal. Honela, bada, larogeita hamasei gizaki produzitzen dira lehenago bat baizik lortzen ez zen lekuan. Aurrerapena...

—Funtsean —bukatu zuen I.E.Z.k—, Bokanowskytzea ez da besterik desarroiluan geraldi batzuk eragitea baizik. Hazialdi normala noizbehinka geraraz ezazu eta horra, Naturaren paradoxaz, obuloak kimatuez erantzuten

dizula. «Kimatuz erantzuten dizula». Lapitzak geroago eta azkarrago zihoazen. Zuzendariak bazter bat seinalatu zuen. Han, geldiro-geldiro zebilen zinta luze batean, portatubo bete-bete bat sartzen zen metalezko kutxa handi batean, eta honen ertzetik beste portatubo bat ateratzen zen, bete-beterik hau ere. Mekanismo honek furrundatxoa ateratzen zuen. Zuzendariak ziotsenez, entseiu tutu haiek hamar minutu behar omen zituzten metalezko kutxa hura alderik alderatzeko. Obuloek zortzi minutuan euts ziezaieketen gehienez X izpiei. Gutxiren batzuk hil ere bai. Gainetikoetan, makalenak erdibitu egiten dira. Gero inkubagailuetara zuzen, non hasten baita kimu berrien desarroilua. Eta geroago, bi egunen buruan, izotzaldi bat ematen zaie kolpera, desarroilua etenik. Bi, lau, zortzi kimu, eta hauek ere kimu berriak botatzen dituzte. Gero alkohol dosi ia hilgarri bat ezartzen zaie; eta horren eraginez berriro kimatzen dira —kimuen kimuen kimuak— eta gero bakez haz daitezen uzten zaie, zeren azkena bailitzateke desarroilua beste behin etetea. Baina begira zer gertatu den bitarte honetan: lehenengo obulo hark zortzitik larogeita hamaseira enbrioi eman dituela. Aurrerapen harrigarria dela aitortu behar Naturari buruz. Biki berdin-berdinak, baina ez binaka, edo hirunaka, erditze aro zahar barregarri haietan bezala. Orduan noiz-behinka baizik ez zen obuloa zatitzen. Orain, ordea, dozenaka eta hogeinaka datozkigu bikiak.

—Hogeinaka —berresan zuen zuzendariak, besoak zabaldurik sari banaketan bezala—, hogeinaka.

Honetan ikasle tentel batek honako zozokeria galdetu zuen, ea non edo zertan zegoen abantaila.

—Zer diok, mutil? —oihukatu zuen zuzendariak, mutilarengana brasta itzulirik—. Ez al duk benetan ere kon-

prenitzen? Ez al dik buruak horrenbesterik ematen? —Eta besoak zabalik aldarrikatu zuen—: Bokanowsky metodoa duk egonkortasun sozialaren tresnarik handiena.

*«Egonkortasun sozialaren tresnarik handiena»*.

Gizon eta emakume estandartuak, erreskada uniformeetan. Fabrika bateko pertsonal guztia horni daiteke obulo Bokanowskytu bakartxo batez.

—Larogeita hamasei biki lanean larogeita hamasei makina berdinetan! —Zuzendariari ahotsak dardar egiten zion ia zoramenez—. Badakigu, bai, nora goazen. Lehenengoz historia guztian. —Eta Estatu Mundialaren lema aipatu zuen—: «Elkartasuna, Idetasuna, Egonkortasuna». —Hitz handiak noski—. Neurri gabe Bokanowskytu ahal baldin bagenu, arazoa konponduta legoke.

Gamma sailez, Delta aldakaitzez eta Epsilon berdinez konpondua noski. Milioika biki ide. Horra anizko produkzioaren printzipioa biologiara aplikatua.

—Baina zoritxarrez —gaineratu zuen zuzendariak— *ez daukagu* neurri gabe Bokanowskytzerik.

Agi danez, larogeita hamasei omen da goia, eta hirurogeita hamabi bataz besteko polita. Ideial hartaraino iristerik ez dagoenez gero, gehienez egin litekeena da ahal bezainbat biki sail ide emanarazi obulo berari eta ar beraren gametoekin. Eta horretantxe ere lanak leudeke.

—Zeren berez hogeita hamar urte behar baitira, berrehun obulo umotzeraino irits daitezen. Gure egitekoa da, ordea, populazioa une honetantxe, hementxe eta oraintxe establetzea. Zertarako litzaiguke bikiak tantagailuz produzitzea mende laurden luze batean?

Ezertarako ere ez, jakina. Baina Podsnap-en teknikari eskerrak, izugarri azkartu da umoaldia. Orain behintzat ziurtzat jo daiteke ehun eta berrogeita hamar obulo umo

gutxienez lortzea bi urteren barruan. Aski da ernaltzea eta Bokanowskytzea —hots, hirurogeita hamabiz biderkatzea—, ia hamaika mila neba-arreben produkzioa eman dezaten bataz beste, ehun eta berrogeita hamar biki sail idetan. Eta bi urteren barruan guztia.

—Eta kasu aparteko batzuetan, hamabost milatik gora indibiduo adulto emanaraz geniezaioke obulo bakarrari.

Honetan handik zebilen gazte gordin ile-hori batengana bihurturik, hots egin zion:

—Aizak, Mr. Foster. Esan al diezagukek zein den obario bakar baten goia, Mr. Foster?

—Hamasei mila eta hamabi Zentro honetan —erantzun zuen zarta Mr. Fosterrek. Oso azkar egiten zuen hitz, begi urdin bizi-biziak zituen, eta bistan zeukan ze atsegin zitzaion zifrak aipatzea—. Hamasei mila eta hamabi, larogeita bederatzi biki sail idetan. Hala ere —jarraitu zuen harrapataka— hoberik lortu dute tropikoko zentro batzuetan. Singapurrek maiz eman ditu hamasei mila eta bostehunetik gora, eta Mombasa iritsia da hamazazpi milaraino. Badute, noski, guk baino abantaila gehiagorik. Ikustekoa duzue nola erantzuten dion beltzen obuloak muki-urari. Harrigarria benetan Europako materialaz lan egitera ohiturik gaudenontzat. Hala ere, oraindik —ekin zion barrezka (baina begiak dizdizka zituen borroka garrez eta kokotsa aurrerantz lotsagabeki irtena)—, hala ere oraindik aurrea hartuko diegulakoan gaude, inondik ahal baldin badugu. Oraingo honetan harrigarrizko Delta-Gutxiago obario batekin ari naiz. Hamazortzi hilabete egin berri da. Hamabi mila eta zazpirehun ume, dekantatuak edo enbrioi gisa, dagoeneko produzituak ditu. Eta oraindik sendo dirau. Irabaziko diegu, bai, oraindik.

—Hori duk hori —hots egin zion zuzendariak. Eta Mr. Fosterri bizkarrekotxo batzuk emanik—: Hator gurekin eta egik mutil hauek ere xurga dezatela hire jakinduria aparta.

—Bai pozik ere —ihardetsi zion Mr. Fosterrek irribarretxo batez.

Bazihoazen aurrerantz. Enbasaketa Salan halako bizkortasun armoniatsua eta ariketa ordenatua nabari zen. Zerri emeen sabel-sare puskak, neurri-neurrira ebakiak, tximistaka igotzen ari ziren, sotoetako Organo-Biltegitik zetozen azentsore txikietan. Furrunda bat, klaskada bat ondoren, eta azentsoreko ateak bapatean irekitzen ziren. Enbase Forratzaileak ez zuen besterik eskua luzatu, puskak hartu, ontzian sartu eta ertzak leundu baizik. Eta enbase forratua, zinta luze batek eramana, eskumenetik aldendu baino lehen, berriro beste furrunda bat, beste klaskada bat, eta han zetorren tximistaren pare beste sabel-sare, puska bat sotoetatik gora, enbasatua izateko prest. Azkenik gabeko prozesioa zen hura, astiro-astiro zinta ibilkorraren gainean.

Forratzaileen ondoren, Matrikulatzaileak zeuden. Prozesioa aurrera zihoan. Bana-banaka obuloak beren entseiu tuboetatik ontzi handiagoetara pasatzen ziren kontuz-kontuz. Sabel-sarearen forrua moztu, obuloa bere lekuan jarri, gatz uretan isuri... eta ontzia joana zen. Etiketatzaileen txanda zetorren orain: heredentzia, ernal fetxa eta zein Bokanowsky sailekoa den numeroa. Zehaztasun guztiok pasa ohi ziren entseiu tuboetatik ontzira. Bukatua zen anonimatoa. Nor bere izenez orain, prozesioa bazihoan horma zulo batetik Predestinapen Sozialeko Salara.

—Larogeita zortzi metro kubiko fitxa —esan zuen sartzean Mr. Fosterrek, golkoa bete pozez.

—Behar den informazio *guztia* dakartenak —gaineratu zuen zuzendariak.

—Goizero eguneratuak.

—Eta arratsero koordinatuak.

—Hauetantxe oinarritzen dira kalkulo guztiak.

—Honenbeste indibiduo honen eta horren kalitatekoak —esan zuen Mr. Fosterrek.

—Holako eta halako kantitateetan banatuak.

—Dekantamenduko honenbestekorik onena edonoiz.

—Ezusteko galerak berehalaxe emendatzeko moduan.

—Berehalaxe —esan zuen Mr. Fosterrek berriro—. Bazenekite zenbat ordu extra sartu behar izan nuen Japoniako azken lurrikararen ostean! —Eta gogotik egin zuen barre, buruari eraginez.

—Predestinatzaileek Ernaltzaileei bidaltzen dizkiete beren datuak.

—Hauek haiei eskuratzen dietelarik eskatu adina enbrioi.

—Eta enbaseak hona etortzen dira, konkretuki predestinatuak izan daitezen.

—Eta ondoren Enbrioi Almazenera zuzen.

—Oraintxe goaz gu ere bertara.

Eta ate bat irekirik, sotora zihoan eskailera batetik behera abiatu zen Mr. Foster.

Tenperatura tropikala zegoen han ere. Ilunabar antzeko giro batean barrena sartu ziren. Bi atek eta bihurgune bikoizdun iraganbide medar batek zaintzen zuten sotoa, inolako argi izpirik ez zedin barrura sar.

—Enbrioiak pelikula fotografikoaren modukoak dira —esan zuen jostari Mr. Fosterrek, aldi berean bigarren

atea bultzatzen zuelarik—. Argi gorriari bakarrik euts diezaiokete.

Izan ere, iluntasun sargori hura, ikasleak atzetik zerraizkiola, hala zen orain ikusgarri eta gori, nola baita udako arratsalde erdian begiak itxita ikusi ohi den iluntasuna.

Alboetako arasa larriak —bakoitzak sekulako botila erreskadak zituela— dizdizka zeuden, errubiz josiak bezala; eta errubi artean, han zebiltzan gizonezko eta emakumezko mamu gorriak, beren begi gorriez eta lupusaren sintoma garbiez. Makinek furrundaka ziharduten, burrundaratxo hartaz beterik airea.

—Emaizkiek zifra batzuk, Mr. Foster —esan zion zuzendariak, ia hizketan nekaturik.

Bai pozik eman ere Mr. Fosterrek eskaturiko zifrak.

Berrehun metro luze, berrehun zabal eta hamar altu. Gorantz seinalatu zuen. Oilotxoek ur edatean bezala, ikasleek sabai alturantz jaso zituzten begiak.

Hiru apal sail: lurraren nibelean, lehenengo galeria eta bigarren galeria.

Galerietako sare metalezkoa alde guztietara zihoan, eta lekutaraino joan ere ilunetan galtzen zelarik.

Handik hurrean hiru mamu gorri ari ziren lan eta lan, eskailera mugikor batetik bolingoiak deskargatuz.

Predestinapen Sozialeko Gelatik zetorren eskailera. Ontzi bakoitza hamabost apaletako batean jar zitekeen; eta apal bakoitza, nahiz eta begiratu hutsez ezin igarri, tren bat zen orduko hirurogeita hamahiru milimetroan zebilena. Berrehun eta hirurogeita zazpi egun, eguneko zortzi metroan. Bi mila ehun eta berrogeita hamasei guztira. Buelta oso bat lurraren nibelean, beste bat lehenengo galerian, buelta erdi bigarrenean, eta berrehun eta hogeita

hamazazpigarren eguneko goizean, Dekantapen Gelan, egun argiz. Horra existentzia independentea deritzana.

—Baina bitartean —bukatu zuen Mr. Fosterrek— anitz gauza egin ditugu. Anitz gauza, alajaina.

—Hau duk hau niri atsegin zaidan izpiritua —esan zuen berriro zuzendariak—. Ea, Mr. Foster, eman dezagun bueltatxo bat eta esplika iezaguk den-dena.

Eta Mr. Fosterrek luzez azaldu zien guztia. Hitz egin zien nola hazten den enbrioia bere sabel sarezko sehaskan. Dastatzera eman zien odol artifizial mardul bat, zeinez elikatzen baita enbrioia. Azaldu zien zergatik eragin behar zaion plazentinaz eta tirosinaz. *Corpus luteum*-en gurinaz hitz egin zien. Mahuka batzuk erakutsi zizkien gero, zeinen bidez automatikoki injektatzen baita gurin hura hamabirik hamabi ordura, zerotik 2.040raino. Hitz egin zien nola geroago eta muki dosi handiagoak sartzen zaizkien ibilaldiko azken larogeita hamasei metroetan. Ama-zirkulazio artifiziala deskribitu zien ontzi bakoitzeko ehun eta hamabigarren metroan jarria; odol artifizialaren biltegia erakutsi zien, eta bonba zentrifugoa, zeinak mugierazten baitu likidoa umontzi osoan zehar eta pasarazten birika sintetikotik eta hondakinen irazkitik. Enbrioiak anemiara duen joera okerra aipatu zien gero, eta nola, beraz, zerriaren sabelkia eta moxal fetoaren gibelkia eman behar zaien dosi handietan.

Mekanismo erraz bat erakutsi zien, zeinaren bidez zortzi metroko azken bietan enbrioi guztiak inarrosten baitira, mugimendura molda daitezen.

Esan zien zer grabedade duen «dekantamenduko trauma» deritzanak, eta zein bide dauden hain arriskuzko shock hura ahalik gutxientzeko, enbrioi enbasatuari entrenamendu egoki bat eraginez. Hitz egin zien nola sexu

frogak eragiten zaizkien berrehungarren metro inguruan. Etiketagintza azaldu zuen gero: T bat arrei, zirkulu bat emeei, eta galdera marka beltz bat hondo zuriaren gainean neutrogaiei.

—Zeren, izan ere, —esan zuen Mr. Fosterrek—, gehienean ernaltzea oztopo besterik ez baita. Mila berrehundik, obario ernalkor bat bakarra zaigu aski gure asmoetarako. Baina aukera handiak nahi ditugu eduki. Zertan esanik ere ez dago segurantza tarte on bat uztea komeni dela beti. Horrexegatik permitzen dugu ehundik hogeita hamar enbrioi eme normalki haz daitezen. Gainetikoei hogeita laurik hogeita lau ordura, hormona sexual arraren dosi bat ematen diegu falta zaien ibilaldian zehar. Zer gertatzen? Hermafrodita bezala dekantatuak direla, guztiz normalak beren estrukturan, nahiz eta —aitortu behar izan zuen— halako joeratxoa eduki bizarra botatzera. Baina agorrak behintzat, eta agortasun garantizatua gainera. Honela noizbait —ekin zion Mr. Fosterrek— Naturaren imitazio ergelaren erresuma utzi eta giza asmamenaren mundu askoz bikainagora goaz.

Eskuak igurtzi zituen. Bada, ez pentsa haiek enbrioien inkubatzeaz bakarrik konformatzen zirenik. Edozein behik ere balegike hori.

—Predestinatu eta egokitu ere egiten ditugu. Gure haurrak gizaki sozialdu bezala dekantatzen ditugu, Alfak edo Epsilonak bezala, geroko putzugin edo geroko... —«Geroko Inspektore Mundial bezala» esatera zihoan, baina garaiz zuzendurik, esan zuen— ... Geroko Inkubagailuetako Zuzendari bezala.

Zuzendariak eskerrak eman zizkion irribarre batez. Hamaikagarren apaleko 320. metro inguruan zihoazen mementu hartan. Beta-Gutxiago gazte bat, mekanikoa be-

ra, destorniladore eta giltza ingeles batez ari zen, botila bateko odol artifizialaren bonban lanean ziharduela. Torkak jiratzean, motor elektrikoak furrunda sendotxoagoa ateratzen zuen, geroago eta sendoagoa. Beste buelta bat giltza ingelesari, begirada bat erreboluzio kontatzekoari, eta horra bukatua lana. Erreskadan bi pauso atzeratu zen gizona eta prozedura berdina hasi zuen hurrengo botilaren bonban.

—Minutuko erreboluzioen kopurua gutxitzen ari da —azaldu zuen Mr. Fosterrek—. Odol artifizialak astiroago zirkulatzen du. Beraz, noiztik noizerago pasatzen da birikatik. Beraz, oxigeno gutxiago damaio enbrioiari. Ez dago oxigeno urritasuna bezalakorik enbrioi bat normalaren azpitik edukitzeko.

Eta eskuak igurtzi zituen.

—Baina zertarako nahi dute enbrioi bat normalaren azpitik eduki? —galdetu zuen ikasle kokolo batek.

—Tenteltzarra! —oihukatu zuen zuzendariak, bere isilaldi luzea etenik—. Ez al zaik bururatu enbrioi Epsilon batek giro Epsilona behar duela, bai eta heredentzia Epsilona ere?

Ez zitzaion, ez, gaixoari horrelakorik bururatu. Lotsa-lotsa eginda geratu zen.

—Zenbat eta kasta apalagoa izan —esan zuen Mr. Fosterrek— hainbat eta oxigeno gutxiago behar du. Zerebroa da lehenen igartzen dion organoa. Eskeletoa gero. Oxigeno normalaren ehundik hirurogeian ipotxak ateratzen dira. Hiruregeitik behera mamutzar begigabeak. Ezertarako ere balio ez dutenak noski.

Mr. Fosterrek konfidentzi ahoskera urduria hartu zuen:

—Baina umoaldia laburtzeko teknikaren bat baldin balego hura garaipena, hura mesedea gizarterako! Pentsa ezazue zaldiarengan —esan zuen.

Ikasleek zadiarengan pentsatu zuten.

—Zaldiak sei urterekin erdiesten du umotasuna. Elefanteak hamarrekin. Gizona, ordea, hamahiru urterekin ere sexuz umotzeko dago oraindik, eta hogeirekin bakarrik erdiesten du ezaguera osoa. Hortixe dator etorri ere giza-adimena, desarroilu berankor horrexen fruitu bezala. Baina Epsilonetan —esan zuen txit zuhurki Mr. Fosterrek— ez dugu adimenik behar.

Eta ez zutenez behar, ez zuten «fabrikatzen» ere. Baina nahiz eta Epsilon baten buruak hamar urterekin erdietsi umotasuna, Epsilonaren gorputzak, ordea, hamazortzi urte arte ez du lanerako balio. Urte luze alferrekoak, umotu arte. Gorputzaren haztea azeleratu ahal balitz behi batena bezain azkarra izateraino, zer negozio izugarria gizartearentzat!

—Izugarria! —marmartu zuten ikasleek.

Gero teknikoago jarri zen. Koordinazio endokrino anormal batetaz hitz egin zien, zeina baita gizonak hain geldiro haztearen kausa. Eta anormaltasun hau germenen aldatze baten gora-behera zela ekin zion. Ba ote legoke germenen aldatze honen efektoak deusezterik? Ba ote legoke indibiduo Epsilon bati, teknika egoki batez, txakurren eta behien normaltasuna bihurtzerik?

Horra, bada, koska.

Pilkintonek, Mombasan, ia lau urterekin atereak zituen indibiduo sexuz umoak eta sei urte t'erdirekin guztiz haziak. Garaipen zientifikoa noski. Baina alferrekoa gizarterako. Sei urteko gizonak eta emakumeak lerdoegiak ziren Epsilon baten lana egiteko ere. Eta metodoa «dena

ala ezer ez» zen. Edo ez zen inolako aldatzerik lortzen edo guztizkoa lortzen zen. Oraindik ekin eta ekin zihardu-ten, hogei urteko adultoak eta sei urteko adultoak harre-man honetan jarri nahian. Baina ordura arte alferrik. Ibili eta ibili, ilunabar antzeko argi gorri hartan zehar, 9. apale-ko 170. metro ingururaino iritsi ziren. Handik aurrera 9. apala itxita zegoen, eta ontziek tunel moduko batean barrena egiten zuten gainetiko joanaldia, bi edo hiru me-tro zabaleko irekidura batzuetan noiz-behinka geratuz.

—Berorako egokipena —azaldu zuen Mr. Fosterrek.

Behin tunel beroa, behin tunel hotza. Tropikoetara destinatuak zeuden, edo meatzari, seda-ehule edo metal-gin izatera. Geroago irakatsiko zitzaien gorputzez nola-ko, burua ere hartara jartzen.

—Guk berora jo dezaten egokitzen ditugu —bukatu zuen Mr. Fosterrek—. Eta goiko solairuko gure lankideek irakatsiko diete beroa maite izaten.

—Eta hona —bata zuen zuzendariak esaera— zorio-naren eta bertutearen maratila: nork zer behar duen egin, huraxe maite. Egokipen guztiek hauxe lortu nahi dute, alegia, nork bere derrigorreko destino soziala maite deza-la.

Bi tunel artean, erizain bat ari zen xiringa luze eta fin bat sartzen aurrerantz zihoan lingirda ontzikada batean. Ikasle eta gidari adi-adi egon zitzaizkion apur batean.

—Ederki, Lenina —esan zuen Mr. Fosterrek, eta Le-ninak xiringa atera zuen eta tente jarri zen. Neskatila ika-raturik bihurtu zen. Zerabilen lupus maskara eta zituen begi gorritu eta guzti ere, bistan zeukan paregabea zela ederrez.

—Henry! —erantzun zion berak ere, eta irribarre bat, gorria hau ere, bidali zion, hortz ilara gorri bat erakusten zuela.

—Neskatila zoragarria benetan —marmartu zuen zuzendariak.

Eta xaflada bat edo bi emanik, gizalegezko irribarre bat irabazi zuen ordainez.

—Zer ematen diezu? —galdetu zuen Mr. Fosterrek, hitzei profesio aire zorrotza ezarririk.

—Betikoa: tifusa eta lo gaitza.

—150. metroan hasten da tropikorako langileen eztiketa —azaldu zien Mr. Fosterrek ikasleei—. Enbrioiek zakatzak dituzte oraindik. Geroko gizonaren eritasun guztien aurka inmunitzen dugu arraina. —Gero, Leninarengana itzulirik, gaineratu zuen—: Arratsaldeko bostak hamar gutxiagotan, teilatuan, beti bezala.

—Zoragarria —esan zuen berriro ere zuzendariak.

Eta beste xaflada bat emanik, lagunen atzetik aldendu zen.

10. apalean, hurrengo gizaldiko langile kimikoen erreskadei tratamendu bat eragiten zitzaien, alkitrana, beruna, sosa errekorra, klorina eta abar jasatera ohi zitezen. Koheteetako 250 mekanikotako enbrioi sailetik lehenengoa orduantxe zihoan 3. apaleko 1.100. metroan. Mekanismo aparteko batek etengabeko errotazioan zerabiltzan haien enbaseak.

—Ekilibrio sena ontzeko —azaldu zuen Mr. Fosterrek—. Kohete baten kanpoko aldeari, hegan doala, konponketak egitea, lan zaila da oso. Zutik daudenean ia hiltzeraino kentzen diegu zirkulazioa. Buruz behera daudenean, berriz, odol artifizialaren jarioa bikoiztu egiten diegu. Honela ikasten dute egoera hau zorionarekin bat

egiten. Izan ere, halaxe daudenean bakarrik dira egitan zoriontsu. Eta orain —jarraiki zen Mr. Foster— Alfa-Gehiago intelektualentzat dugun egokimendu interesgarri bat erakutsi nahi nizueke. Bostgarren apalean daukagu hauen talde on bat. Lehenengo galerian —hots egin zien Mr. Fosterrek beheko pisurantz abiatu ziren bi ikasleei— 900. metro inguruan daude. Ez dago inolako egokimendu intelektual efikazik egiterik, fetoak buztana galtzen duen arte.

Baina zuzendariak erlojuari begiratu zion.

—Hirurak hamar gutxiago —esan zuen—. Denborarik ez ote dugun nago enbrioi intelektualak ikusteko. Haurtegietara igo behar diagu. Haurrak siestatik itzarri baino lehen.

Mr. Fosterrek desengainutxoa hartu zuen.

—Dekantapen Gelari begiratu bat bederen —erregutu zuen—.

—Tira, bada, ondo zegok. —Zuzendariak irribarre egin zuen adeibera—. Baina begiradatxo bat bakarrik gero.

# BIGARREN KAPITULUA

Mr. Foster Dekantapen Gelan geratu zen. I.E.Z. eta bere ikasleak azentsorerik hurbilena hartu eta bostgarren pisura igo ziren.

HAURTEGIA. NEO-PAULOV EGOKIPEN GELA, zioen sarrerako txartel batek.

Zuzendariak ate bat ireki zuen. Gela handi huts batean sartu ziren. Txit distiratsu eta eguzkitsu zegoen dena, hegoaldeko horma kristalezkoa baitzen alderik alde. Dozena erdi inude zebilen bertan, glutina zurizko galtzaz eta jakaz uniformatuak, eta adatsak txano zurien pean gordeak. Arrosadun jarroiak lurrean ipintzen ari ziren erreskada luze batean. Milaka lore hosto, guri eta zetazko, aingeru masailen antzo. Baina argitasun bizi hartan, aingeru arrosazkoak eta arioak ezezik, baziren txinatar distiratsuak eta mexikarrak ere; baziren apopletikoak ere, zeruko turutei puzka eta puzka ekinez; baziren herioa bezain zurbilak ere, marmolaren azken zuritasunezko zurbiltasunez. I.E.Z. sartzean, inudeak zorrozki koadratu zitzaizkion.

—Jar itzazue liburuak —agindu zuen zuzendariak.

Inudeek isilik obeditu zuten. Arrosa murkoen artean behar bezala jarri zituzten liburuak: han geratu zen zabalik haurren liburu erreskada bat, abere, arrain edo txorien irudi poliki koloreztaturen bat erakusten zuelarik bakoitzak.

—Eta orain ekar itzazue haurrak.

Inudeak agudo atera ziren salatik, eta handik minutu bat edo bitara itzuli. Bakoitzak tezko gurditxo antzeko bana zekarren, oso altua; gurditxo bakoitzak metal-sarezko launa apal, eta apal bakoitzean zortzi hileko haurtxo bana. Denak ziren berdin-berdinak (Bokanowsky sail bat, noski) eta denak kaki kolorez jantziak, Delta kastakoak baitziren.

—Jar itzazue lurrean.

Laster deskargatu ziren gurditxoak.

—Eta orain jar itzazue lore eta liburuak ikus ditzaketen moduan.

Haurtxoak berehalaxe isildu eta arrastaka abiatu ziren koloretza bizi haietarantz, liburuen orri zurietan ageri ziren irudi alai eta dirdirakor haietarantz. Ia hurbil zeudenean, eguzia itzali zen pixka batean, laino baten ostean ezkutaturik. Arrosak garretan jarri ziren, barruko irrits batek eraginda bezala. Beste esanahi berri eta sakon bat erne zela zirudien liburuetako orri argitsuetan. Lauoinka zebiltzan haurren artetik asalduzko garrasitxoak, txilioak eta pozezko burrunbatxoak aditzen ziren.

Zuzendariak eskuak igurtzi zituen.

—Zoragarri —hots egin zuen—. Apropos eginda ere ezin hobeto.

Azkarrenak ia iritsiak ziren liburuetaraino. Kontuz-kontuz luzatzen zituzten beren eskutxoak, ukitzen, oratzen eta hostokatzen zituzten arrosa transirudituak eta zi-

murtzen liburu orri argitsuak. Zuzendaria zain egon zen apur batean, haurtxo guztiak jostaketan hasi arte. Orduan esan zuen:

—Begira orain ondo.

Inude nagusia giltza koadro baten ondoan zegoen zutik salako beste ertzean, eta palankatxo bat jaitsi zuen.

Eztanda gogor bat entzun zen. Adar bat joka hasi zen geroago eta zorrotzago. Alarma txirrinak kolpera disparatu ziren. Haurtxoak zeharo ikaratu ziren eta txilioari eman zioten. Aurpegiak dardar zeuzkaten izuaren izuz.

—Eta orain —esan zuen oihuka zuzendariak (izugarrizko abarrotsa baitzegoen)— orain biribil dezagun lezioa shock elektriko txiki batez.

Beste seinale bat egin zuen eskuaz eta inude nagusiak beste palanka bati eman zion. Haurtxoen garrasiak bapatean aldatu ziren. Halako etsipen zer bat, halako erotasun zer bat ziruditen orain haurren ezpainetatik zetozen txilio zorrotz beldurgarriek. Gorpuzñoak bihur-artezka zebilzkien. Gorpuzki guztiak dardarka zeuzkaten, alanbre ezkutu batzuen tirakadak obedituz bezala.

—Lurreko alderdi guzti hau elektrika genezake —hots egin zuen zuzendariak, azalpen bezala—. Baina oraingoz aski da.

Eta beste seinale bat egin zion inudeari.

Bukatu ziren danbarradak, mututu ziren txirrinak eta adarraren hotsa ere jausten ari zen zeharo isildu arte. Gogorrik eta bihurrik zeuden gorpuzñoak lasaitu ziren. Eta lehen zotinka eta uluka ziharduten haur senetik atereek, orain negar normalari eman zioten berriro, beldur arrunteko negarrari.

—Eman iezazkiezue berriro liburuak eta loreak.

Inudeek obeditu zuten. Baina arrosak hurbiltzean eta katutxo, oilar eta ardien irudi alai koloretsuak ikusiz batean, haurrak izu-ikaraz apartatu ziren. Hura zen negar egitea!

—Begira —esan zuen zuzendariak, aire gailenez—. Begira.

Liburuak eta zarata handiak, loreak eta deskarga elektrikoak. Honetaz aurrera bi gauza hauek bortizki elkartuak daude haurren buruetan. Eta berrehun bider honelako edo antzeko lezio bat eraginez gero, elkartasun hori hautsiezina izango da. Gizonak batu duena ezin dezake Naturak bereizi.

—Psikologoek gorroto «instintiboa» deitzen dutena izango diete beti liburuei eta loreei. Erreflexu egokituak behin betirako. Liburuetatik eta botanikatik libre daudeke bizitza guztirako —Zuzendaria inudeenganantz bihurtu zen—. Eraman itzazue.

Negarrez oraindik, kakiz jantziriko haurtxoak gurditxoetan kargatu zituzten berriro eta salatik erretiratu, atzean esne mingots usaina uzten zutelarik, bai eta isiltasun atsegina ere.

Ikasle batek eskua jaso zuen. Ederki konpreniten zuen, inola ere, kasta apalentzat luxu gehiegi zela elkartearen denbora liburuetan alferrik galtzea; ederki konprenitzen zuen beti zegoela zoritxarrez arriskua, beren erreflexu egokituren bat deusez dezaketen liburuak irakurtzekoa, baina... baina, lore kontu hari ezin inola ere antzeman. Zertarako nekatu lorezaletasuna psikologiaz ezineko bihur dakien Deltei?

I.E.Z.k patxadan azaldu zien dena. Haurrei, loreak ikustean, ulu eragiten bazitzaien, politika ekonomiko handi bati jarraitzearren zen. Ez zela denbora askorik (mende

bat gutxi gorabehera), Gammak, Deltak eta Epsilonak berak ere loreak gustatzeko eran egokitzen zituzten. Loreak bereziki eta Izadi basatia jeneralki. Hauxe nahi zuten orduan lortu, alegia, noiznahi kanpora irtenarazi, transportea kontsumi zezaten.

—Ez al zuten, bada, transporterik kontsumitzen? —galdetu zuen ikasle batek.

—Bai horixe —erantzun zion I.E.Z.k—. Baina transporte hutsa bakarrik.

Bazko loreek eta paisaiek, akats bat dute: debaldekoak direla. Izadi zaletasunak ez die fabrikei lanik ematen. Izadi zaletasuna abolitzea erabaki zuten, kasta apalen artean bederen. Izadi zaletasuna abolitu, noski, baina ez transportea kontsumitzeko joera. Zeren, jakina, behar-beharrezkoa baitzen mendira joateko gogoz segi zezaten, nahiz eta mendia gorroto izan. Honetantxe zetzan gakoa, alegia, bazko lore eta paisaia zaletasun hutsa baino arrazoi ekonomiko sendoagorik aurkitu behar zela, transportea kontsumitzeko. Bai eta aurkitu ere.

—Masak egokitzen ditugu natura gorrota dezaten moduan —bukatu zuen zuzendariak—. Baina natur kirolak maite ditzaten ere egokitzen ditugu aldi berean. Horretaz gainera kontu handia daukagu kanpo libreko kirol guztiek aparatu konplikatuen usadioa ekar dezaten. Honela, transporteaz gainera, artikulu fabrikatuak ere kontsumitzen dituzte. Horra zertarako diren deskarga elektrikoak.

—Konprenitzen dut —esan zuen ikasleak.

Eta zeharo harritua, isilik geratu zen.

Isilunea luzatu zen. Gero, eztarria garbiturik, honela hasi zen zuzendaria:

—Duela denbora asko, gure Ford oraindik lurrean zegoela, bazen mutiko bat Reuben Rabinovitx zeritzana.

Polakoz mintzatzen ziren guraso batzuen seme zen Reuben. Polakoa zer den jakingo duk horraitio.

—Hizkuntza hil bat.

—Frantsesa eta alemaniera bezalaxe —gaineratu zuen beste ikasle batek, bere jakinduriatxoa agertu nahiz.

—Eta «guraso»? —galdetu zuen I.E.Z.k.

Ixilune latza egin zen. Mutil batzuk lotsatu egin ziren. Oraindik ez zuten ikasi bereizten zer alde zegoen lizunkeriatik zientzia soilera; alde handia, noski, baina sarritan igarkaitza. Halako batean ausartu zen bat eskua jasotzera.

—Behinola gizakiak... zera... —dudan jarri zen; odola matrailetaraino igo zitzaion—. Beno, erditzaileak ziren.

—Ederki —esan zuzendariak, ontzat emanez.

—Eta haurrak dekantatuak zirenean...

—Jaiotzen zirenean —zuzendu zion.

—Ba, orduan, gurasoak ziren... Tira, nahi dut esan... ez haurrak, jakina, besteak baizik.

Mutil gaixoa zeharo lotsaturik eta nahasturik geratu zen.

—Besteak beste —laburtu zuen zuzendariak— gurasoak aita eta ama ziren.

Hura zen lizunkeria! Benetako zientzia, noski, baina mutilak mutu geratu ziren, danbarrada bat entzun balute bezala.

—Ama —berresan zuen ozenki zuzendariak, zientziaren muina sarrarazi nahiz; eta bere aulkian patxadatsu eseririk, esan zuen astunki—: Badakit, bai, gauza higuingarriak direla hauek. Baina historiako gauzarik gehienak dira higuingarriak.

Gero Reuben txikiaren harira jo zuen berriro. Reuben txikia, bai, zeinaren gelan gau batez deskuidoz, haren ai-

ta-amek (hau duk zerrikeria!) irratia martxan utzi baitzuten (bada, jakin beharrik zaudete erditze aro nazkagarri haietan, haurrak beren gurasoekin hazten zirela beti, eta ez Estaduaren Egokitegietan).

Mutikoa lotan zegoela, hara non Londrestik irrati programa bat ematen ari ziren. Eta biharamun goizean, txunditurik utziz bere zerraita-zerramak (mutilik ausartenek irribarre egin zioten elkarri), Reuben txikia konferentzia luze bat hitzez hitz esanez itzarri zen. Konferentzia hura behinolako idazle xelebre batek emana zen («bere obrak gureganaino iritsi ahal izan diren idazle gutxi-gutxietariko bat»). George Bernard Shaw zeritzan, eta orduko tradizio sendoari jarraiki, bere buruaren jeinuaz mintzo ohi zen beti. Reuben txikiaren zerek... (keinua eta irritxoa) konferentzia hura ez zuten, jakina, tutik ere konprenitzen, eta semea kolpera zoratu zitzaielakoan, medikua ekarri zioten. Zorionez medikuak bazekien ingelesa, eta laster konturatu zen Shawek bezperan irratiz emandako hitzaldia zela. Konprenitu zuen gertatuaren esanahia, eta berehalaxe bidali zien haren berri publikazio mediko guztiei.

—Lotako irakaskintza printzipioa, edo hipnopedia, aurkituta zegoen.

I.E.Z.k atseden patxadatsu bat egin zuen.

Printzipioa aurkituta zegoen; baina urteak eta urteak iragan ziren, printzipio hori onuraz aplikatu baino lehen. Reuben txikiaren kasua hogeita hirugarren urtera gertatu zen bakarrik, gure Fordek bere lehen T Modeloa merkatura jaurtiki zuenetik. Hitz hauek esatean T seinalea egin zuen zuzendariak bere sabel gainean, eta ikasle guztiek ere beste hainbeste egin zuten errespetuz.

Amorrazioz ari ziren ikasleak koadernoan zirriborroka:

*«Hipnopedia, lehenengoz ofizialki erabilia Ford osteko 214an. Zergatik ez lehenago? Bi arrazoi: (a)...»*

Lehen esperimentu hauek —ziotsen I.E.Z.k— okerreko bidetik zebiltzan. Inbestigatzaileek uste zuten hipnopedia hezigailu intelektual handi bat bilaka zitekeela. Haur batek eskuin aldera lo egiten du, eskuineko besoa luze eta ezkerreko eskua ohetik behera zintzilik. Kutxa baten ertzean egindako zulo saredun biribiletik, ahots bat mintzo da emeki-emeki:

«Nilo da Afrikako ibairik luzeena eta munduko ibai guztietatik bigarrena luzez. Nahiz eta Mississippi-Missouri baino laburtxoagoa izan, Nilo da munduko ibairik inportanteena bere altzoaren zabalari begiratuz gero, 35 gradu zabal hedatzen baita...»

Biharamun goizean, esaten dio norbaitek:

—Aizak, Tommy, ba al dakik zein den Afrikako ibairik luzeena?

Haurtxoak ezetz buruaz.

—Baina ez al haiz oroitzen honela hasten den zeraz: Nilo da...?

—Nilo - da - Afrikako - ibai - rik - luzeena - eta munduko - ibai - guztie - tatik - bigarrena - luzez. —Hitzak barra-barra ateratzen zaizkio mutikoari ezpainetatik—. Nahiz - eta - Missi - ssippi - Misso - uri - bai - no...

—Bapo. Zein da, orduan, Afrikako ibairik luzeena?

Begiak marro ageri zitzaizkion Tommyri.

—Ez dakit.

—Nilo, Tommy, Nilo.

—Nilo-da-Afrikako-ibairik-luzeena-eta...

—Zein duk, Tommy, munduko ibairik luzeena?

Tommyk negarrari ematen dio.

—Ez dakit —dio zotinka.

Negar hauek entzutean, zuzendariak azaldu zuenez, etsita geratu ziren lehenengo inbestigatzaileak. Esperimentu hauek bertan behera utzi zituzten. Ez zuten gehiago ahaleginik ere egin haurrei lotan Niloren luzera irakasteko. Ederki egina gainera, ez baitaiteke ikas inolako zientziarik, zertaz tratatzen duen jakin gabe.

—Aitzitik, hobe heziketa *moraletik* hasi izan balira —esan zuen zuzendariak aterantz abiatzen zela. Ikasleak atzetik zerraizkion, koadernoak harrapataka zirriborratuz, azentsoreraino iritsi arte—. Heziketa morala, bai, inoiz ere, inon ere, arrazoizkoa izan behar ez duena.

—Ixo, ixo —hots egin zuen altaboz batek, azentsoretik irtetean, hamalaugarren pisuan, eta «ixo, ixo»ka ari ziren aspertzeke pasilu guztian zehar, han-hemen zeuden altabozak. Ikasleak eta zuzendaria bera ere automata gisa hasi ziren behatz puntetan ibiltzen. Bai, berak Alfak ziren, noski. Baina Alfak ere egokituak izan dira. «Ixo, ixo». Hamalaugarren pisuko aire guztia dardarka ari zen agindu bortitz harez.

Berrogeita hamar metro behatz puntetan ibili ondoren, ate bat aurkitu zuten. Zuzendariak kontuz-kontuz ireki zuen. Atalburua iraganik, logela itxi bateko erdi itzalean barrena sartu ziren. Larogei kamaina zeuden horma kontrara. Arnas hots arina eta erregularra entzuten zen, eta etengabeko murmurika, ahots txit ahul batzuk han urrunean zurrun-zurrun baleude bezala.

Sartzeaz batera, inude bat zutitu eta zuzendariaren aurrean koadratu zen.

—Zein da gaur arratsaldeko ikasgaia? —galdetu zuen honek.

—Lehenengo berrogei minutuetan Sexu Elementala eduki dugu —erantzun zion inudeak—. Baina orain Klase Sozialen Kontzientziari gagozkio.

Zuzendaria geldiro-geldiro paseatu zen kamaina erreskadan zehar. Han zeutzan larogei haurtxo lozorro lasaian, emeki-emeki hatsartuz.

Bururdi bakoitzaren pean zurrungatxoa aditzen zen.

I.E.Z. geratu eta, ohetxo baten gainera makurturik, adi-adi jarri zen.

—Klase Sozialen Kontzientzia? —esan zuen zuzendariak—. Entzun dezagun berriro altabozetik.

Logela ertzean altaboz bat zegoen hormatik zintzilik. Zuzendaria hurreratu eta interruptoreari sakatu zion.

«...berdez janzten dira guztiak —esan zuen ahots leun baina txit argi batek, esaldi baten erditik hasirik—, eta Delta haurrak kakiz janzten dira guztiak. O! ez, inola ere ez, nik ez dut Delta haurrekin jostatu nahi. Epsilonak, berriz, are zatarragoak dira. Ergel garbiak dira. Idazten eta irakurtzen ere ez dakite. Gainera beltzez jazten dira. Kolore nazkagarriagorik! Zer poza Beta naizelako!» Geraldi bat egin zen. Gero honela jarraiki zen ahotsa: «Alfa haurrak grisez jazten dira. Guk baino askoz lan gehiago egiten dute, oso buru argikoak baitira. Benetan ere pozik nago Beta naizelako, ez baitaukat hainbeste lan egin beharrik. Gainera gu Gammak eta Deltak baino askoz hobeak gara. Gammak ergel hutsak dira, berdez jazten dira guztiak, eta Delta haurrak kakiz jazten dira guztiak. O!, ez, inola ere ez, nik ez dut Delta haurrekin jostatu nahi! Epsilonak, berriz, are zatarragoak dira...»

Zuzendariak berriro itxi zuen interruptorea. Isildu zen ahotsa. Lehengo murmurio motela baizik ez zen entzuten larogei bururditxoen pean.

—Oraindik beste berrogei edo berrogeita hamar aldiz ekingo zaie iratzarri baino lehen, eta halaber osteguneko saioan; eta berriro larunbatean. Ehun eta hogei aldiz, astean hiru ikasgai.

Horra larrosak eta deskarga elektrikoak, Delten kakia eta azafetida bufada, behin betiko elkartuak, haurrek hizketan ere ikasi aurretik. Baina hitzik gabeko egokimendua zakartxo eta baldrestxo gertatzen da, noski; ezin dezake bereizketa zorrotzagorik egin; ezin ditzake portaerarik konplexunak ezarri. Honetarako hitzak behar dira, baina arrazonamendu gabeko hitzak: Hipnopedia, alajaina.

—Inoizkorik indar sozialtzaile eta moraltzailerik handiena.

Ikasleek beren koadernoetan apuntatu zuten. Zientziaren iturritik bertatik hara.

Zuzendariak interruptoreari sakatu zion berriro.

«...oso buru argikoak baitira», zioen lehengo ahots leun, sarkor eta asperkaitzak. «Benetan ere pozik nago Beta naizelako, ez bait...»

Ez, noski, ur tantak bezala, nahiz eta urak granitorik gogorrena ere zula dezakeen; baizik lakre urtuzko tantak bezala, tanta itsaskorrak, inkrustakorrak, non erori han finkatzen direnak, harik eta haitza bloke gorri bakar bihur dadin arte.

—Harik eta haurren burua sugestio horietantxe transformatu arte, eta haurren burua sugestio horiexen bilduma izan arte. Eta haurren burua ezezik, adultoarena ere bai, bere bizitza guztirako. Sugestio horiexen arabera juzkatzen, desiatzen, erabakitzen... duen burua. Eta sugestio hauek *geure* sugestioak ditugu! —Ia oihuka hasi zen zuzendaria, senetik ere aterea—. Estaduaren sugestioak!

Ukabilkada bat eman zion mahai bati.

—Hortik, beraz, atera kontu…

Marmario batek bira eragin zion.

—O, Ford! —hots egin zuen beste aire batez—. Ederra egin diat. Haurrak iratzarri dizkiat.

# HIRUGARREN KAPITULUA

Kanpoan, lorategian, jolas ordua zen. Ekaineko eguzki galdapean biluzik, han zebiltzan seirehun edo zazpirehun neskato-mutiko, batzuk alderik alde korrika, txilio zorrotz jaurtika, pilotan jokatuz; bestetzuk isilik eserita, sasiarte loretsuan ezkutaturik, binaka edo hirunaka. Arrosadiak lorean zeuden. Bi urretxindor ari ziren bakar kantari hosto artean, eta kuku batek desafinatzen zuen pixka bat ezki artean. Airea bibraka zegoen erleen eta helikopteroen furrundaz.

Zuzendaria eta ikasleak geldi egon ziren apur batean, nola haur talde batek Pilota Zentrifugoan jokatzen zuen begira. Hogeikote batek korroa egiten zuen altzairu kromatuzko dorre baten inguruan. Dorre gailurreko plataforma batera jaurtiki behar zuten pilota. Orduan pilota dorre barrutik behera erortzen zen, izugarri azkar jiraka ziharduen disko bateraino iritsi arte. Disko honek pilota ikutuz batera, tximistan jaurtikitzen zuen kanporantz, dorre armazoiak zituen anitz zuloetariko batetik. Eta haurrek harrapatu egin behar zuten.

—Xelebrea duk —ekin zion zuzendariak, handik aldentzean—, xelebrea duk pentsatzea gure Forden denboran ere, gehienean, ez zutela beste jostailurik, ezpada pilota bat edo bi, makilatxo batzuk, eta inoiz sare bat. Pentsa nolako astakeria den, kontsumorik deus ere gehitzen ez duten joko konplikatuetara jokatzen uztea jendeari. Astakeria garbia. Gaur egungo inspektoreek ez dute inolako joko berririk onartzen, lehendik dauden jokorik konplikatuenak adina aparailu gutxienez beharko dituela demostratu ezik. —Atsedentxo bat egin zuen—. Hona hemen talde zoragarri bat —esan zuen, seinalaturik.

Belarditxo batean, Mediterraneoko txilartza altu batzuen artean, bi neska-mutiltxo —mutikoak sei urte eta neskatoak bat gehiago beharbada— jolasean ari ziren, inbestigazio lanean diharduten zientzigizonak bezain serio eta adi. Zertara? Lehen mailako sexu jokoan jokatzen zuten.

—Zoragarria, zoragarria —berresan zuen bihozbera I.E.Z.k.

—Zoragarria —baieztu zuten mutilek ere kortesia handiz.

Baina haien irribarreak bazuen halako zerbait derrigorreko samarrik: zeren oso denbora gutxi baitzen berek utzi zituztela haur jolas haiek; denbora gutxiegi, noski, arbuiorik gabe begira egon ahal izateko. Zoragarria? Bi neska-mutikondo baizik ez ziren haiek, inozokeriak eginez. Inozokeria hutsak, umekeriak.

—Beti pentsatu izan dut… —hasi zen zuzendaria, lehen bezain bihozbera.

Baina negar garrasi zorrotz batek isilarazi zuen.

Inude bat zetorren handik hurreko sasitza batetik, mutiko bat negarrez zekarrela eskutik. Neskatotxo bat zetorkion atzetik orpoz orpo, estu eta larri korrika.

—Zer arraio gertatzen da? —galdetu zuen zuzendariak.

Inudeak bizkarrak jaso zituen.

—Ezer ez axolazkorik —erantzun zuen—. Ez da besterik mutiko hau pixka bat uzkur eta elkargaitza dela besteen joko erotikoetan. Lehendik ere karguturik nengoen bi edo hiru aldiz. Eta orain lehenera jo du berriro. Negarrari eman dio eta…

—Egitan ere —esan zuen aurpegikera larridun neskatoak—, nik ez nion txarrik egin nahi.

—Jakina, bada, ezetz, enetxo —esan zion inudeak lasaitu nahiez—. Horregatik —jarraitu zuen berriro zuzendariarengana itzulirik—, Psikologiako Superintendente Laguntzaileari eraman behar diot. Ea anormaltasunik duen edo ikus dezan.

—Ederki —esan zuen zuzendariak—. Eramazu hara. Eta zu geratu berton, neskatxo —gaineratu zuen, inudea mutil negartiarekin aldentzen zelarik—. Nola duzu izena?

—Polly Trotsky.

—Bai izen pollita, zeu bezalakoa —esan zuen zuzendariak—. Zoaz eta ea beste mutikoren bat aurkitzen duzun jolas laguntzat.

Neskatoak arinari eman zion sasiarterantz eta bistatik galdu zen.

—Haurtxo xarmangarria! —esan zuen zuzendariak, aldendu zen alderantz begiraturik; eta ikasleengana bihurturik, jarraitu zuen—: orain esango dizuedana ez didazue beharbada sinetsiko. Baina Historiara ohitzeko dagoenari, lehenagoko gertaera guztiak iruditzen zaizkio sinesgaitz.

Eta egia harrigarri hau jakinarazi zien. Denboraldi luze batean Gure Forden aurretik, baita ondorengo gizaldi batzuetan ere, neska-mutiltxoen arteko maite jokoak zer anormaltzat jotzen zituzten (barre algara ederrak atera zitzaizkien); eta anormaltzat ezezik egitan inmoraltzat (bai zera!), eta beraz, zorrozki debekatuta zeuden.

Entzuleen aurpegiak zeharo sinesgogor ageri ziren. Nola zitekeen haurtxo gaixoei jolastea debekatzea?

Ezin zuten sinetsi.

—Gaztetxoek berek ere debekatuta zeukaten —jarraitu zuen I.E.Z.k—. Zeuek bezalako gaztetxoek...

—Ezin daiteke hori!

—Autoerotismo pixka bat eta homosexualtasunaz aparte, ezertxo ere ez zen zilegi.

—*Ezertxo ere ez?*

—Gehienean hogei urte bete arte behintzat.

—Hogei urte? —berresan zuten ikasleek oihartzun bat bezala, tutik ezin sinetsiz.

—Hogei, bai —esan zuen berriro zuzendariak ere—. Esan nizuen ez zenidatela sinetsiko.

—Zer gertatzen zen, bada? —galdetu zuten mutilek—. Zer ondorio zetorren hortik?

—Ondorio negargarriak, noski.

Honetan ahots astun eta ozen bat sartu zen solasean ustekabez.

Denek jira egin zuten. Talde txikiaren ertzean gizon ezezagun bat ageri zen: altuera erdizkoa, ile beltza, okil sudurra, ezpain gorri gizenak, eta begi ilunak, taratulu irudikoak.

—Negargarriak —esan zuen honek ere.

Mementu hartan I.E.Z. eserita zegoen, lorategian zehar egoki banaturik zeuden altzairuzko eta kautxozko aul-

kietako batean. Baina ezezagun hura ikusiz batera, zutitu zen kolpera eta korrika joan zitzaion bila, besoak zabalik, hortz guztiekin irribarre eginez, biguntasuna zeriola.

—Kaixo Inspektorea! Hau atsegin ezustekoa! Aizue mutilak, zer pentsatzen zaudete? Hona berton Inspektorea: Bere Fordtasun Mustafa Mond.

Zentroko lau mila geletako lau mila erloju elektrikok arratsaldeko laurak jo zituzten denek batera. Altabozak oihuka ari ziren. «Lehenengo txandaren erreleboa! Bigarren txanda hasten da! Lehenengo txandaren erreleboa! Bigarren...!»

Azentsorean, jantzitokira bidean, Henry Foster eta Predestinapen Zuzendari Ordea zeuden, apropos bizkar ematen ziotelarik Bernard Marx-i, Psikologiako Bulegokoari. Ahalegin guztiak egiten zituzten ahalik eta harremanik gutxien edukitzeko fama txarreko gizon harekin.

Enbrioi Almazenean makinen zurrunka-kirrinkek aire gorriari dardar eragiten zioten oraindik. Txanda bati beste batek jarraitzen zion; aurpegi gorri luputsu batek beste bati uzten zion leku. Trenak maiestasunez eta etengabe arrastaka zebiltzan, geroko gizonen eta emakumeen eraman-ekarrian.

Lenina Crowne aterantz abiatu zen.

Bere Fordtasun Mustafa Mond! Ikasleak begiak ere galdu beharrik zeuden ia. Mustafa Mond! Munduko hamar Inspektoreetako bat! Mendebaldeko Europako Inspektore Nagusia! Hamarretako bat... eta aulkian eseri zitzaien, I.E.Z.rekin batera; eta bertan geratzeko zen, geratzeko, bai, eta areago oraindik hitz egiteko ere prest zegoen... Zuzen-zuzen iturritik hara! Zuzen-zuzen Forden beraren ezpainetatik hara!

Honetan bi neska-mutiltxo atera ziren inguruko sasiarte batetik; apur batean begira egon zitzaizkien, begiak zabal-zabalik eta harriduraz beterik, eta berriro beren hosto arteko jolasetara bihurtu ziren.

—Uste dut denok —esan zuen Inspektoreak bere ahots sendo astunez—, uste dut denok gogoan daukazuela Gure Forden esaera eder eta zuhur hura: «Historia atso ipuin bat duk —esan zuen geldiro-geldiro—, atso ipuin bat».

Eskuari eragin bat egin zion, lumabal ikuskaitz batez hauts pixka bat kendu balu bezala, eta hauts hura Harappa zen, Ur Kaldeakoa zen. Baita amaraun batzuk ere, eta amaraun haiek Tebas eta Babilonia ziren, Knosos eta Mizenas. Beste eragin bat lumabalari, eta hara Ulises, Job, Jupiter, Gautama eta Jesus betiko aldenduak. Beste eragin bat gehiago eta hara betiko ezereztatuak Atenas, Erroma, Jerusalem eta Inperio Zerutarra zeritzen putzu zahar haiek. Beste bat, eta hara Italiako lur zena basamortu bihurtua. Beste bat eta Katedralenak egin zuen. Beste bat eta beste bat, eta agur *Errege Lear* eta Pascalen *Pentsamenduak*. Beste bat eta agur *Pasioa*. Beste bat eta, pikutara *Requiem!* Best bat eta, pikutara *Sinfonia!* Beste lumabalkada bat, eta...

—Gaur arratseko sentsoramara joatekotan al hago, Henry? —galdetu zuen Predestinatzaile laguntzaileak—. «Alhambra» filme ederra dela esan zidatek. Amodiozko eskena bat zegok hartz larruzko alfonbra baten gainean. Zoragarria omen duk. Hartzaren ile guztiak dituk erreproduzituak. Ikumen efektu harrigarriak omen ditik.

—Honegatik ez zaizue Historiarik irakasten —zioen Inspektoreak—. Baina heldu da ordua...

I.E.Z.k artega begiratu zion. Zurrumurruak zebiltzan, Inspektorearen bulegoan honelako eta halako liburu zahar debekatuak zeudela, segurantza-kutxa batean gordeak. Bibliak, Poesiak... Jakin ere zer ez zekien Fordek!

Mustafa Mond kargutu zen haren begirada larriaz, eta ironiaz zimurtu zituen bere ezpain xoko gorriak.

—Lasai, zuzendari, lasai —esan zuen burla aire finez—. Ez ditut, ez, alferrik galduko.

I.E.Z. zur eta lur geratu zen.

Arbuiatu sentitzen direnak, arbuiatu ageri nahi. Izan ere Marx Bernarden aurpegian ageri zen irribarrea arbuiozkoa zen. Hartzaren ile guztiak! Bai eta zera ere!

—Ahalegin guztiak egingo ditiat joateko —esan zuen Henry Fosterrek.

Mustafa Mond aurrerantz makurtu zen eta eri luzea haienganantz luzatu zuen.

—Aski duzue konprenitzen saiatzea —esan zuen, eta haren ahotsak entzuleen diafragmei dardar eragin zien—. Saia zaitezte konprenitzen, zer sentiaraz zezakeen ama erditzailea edukitzeak.

Berriro ere hitz lizun hura. Baina oraingoan irribarre egin zezakeenik ere ez zitzaion inori bururatu.

—Saia zaitezte pentsatzen zer zen «nor bere familiarekin bizi izatea».

Saiatu ziren, baina alferrik.

—Eta ba al dakizue zer zen «sukalde» bat?

Denek ezezkoa egin zuten buruaz.

Soto ilun gorriskatik atera ziren. Lenina Crownek hamazazpi solairu igo zituen, azentsoretik irtetean eskuinerantz hartu zuen, handik pasilu luze batean zehar aurrera jo zuen, eta, *Emakumeen Jantzitegiko* atea irekirik, besoz,

golkoz eta barruko arropaz beteriko kaos itzel batean murgildu zen. Ur beroa barrastaka erortzen zen ehundaka baineratan, edo borborka ateratzen haietatik ur-zuloetan zehar. Larogei masaia tresna —haizez eta bibrazioz zebiltzanak— zurrunka eta txistuka ari ziren; larogei eme ale bikainen haragi gihar eta eguzkiz erreak igurtzitzen eta milikatzen zituzten denek batera. Deiadarka mintzo ziren denak. Musika sintetikozko makina batek superkornetaren *solo* bat jotzen zuen.

—Kaixo, Fanny —esan zion Leninak pertxategia eta armairua berearen alboan zituen neskatxari. Fannyk Enbase Gelan egiten zuen lan eta berak ere Crowne zuen abizena. Baina Planetako bi mila milioi biztanleen artean nola hamar mila deitura baizik ez zegoen, idetasun hori ez zen batere harritzekoa. Leninak tiratu zien bere kremailerei: beherantz jakakoa, beherantz, bi eskuez, galtzetako bi kremailerak, eta beherantz barruko arropak ere, eta, galtzerdi eta zapata hutsik, bainurantz abiatu zen.

Sukaldea, sukaldea... Gelatxo batzuk jendez josiak, gizon bat, emakume bat aldizka haurdun, eta edade guztietako haur multzoa. Ez airerik, ez lekurik. Esterildu gabeko presondegi bat. Ilunbea, eritasunak eta kiratsak. (Hain bizi eta gordin agertu zien Inspektoreak sukaldea, non mutil bat, besteak baino sentikorrago izaki, zurbil-zurbil geratu baitzen deskripzio hutsez eta mareatu hurran egon zen).

Atera zen bainutik Lenina, lehortu zen toaila batez, hartu zuen horman zegoen tutu luze zauli bat, apuntatu zuen hartaz bere bularrera, bere burua hiltzera balihoa bezala, eta gatuari sakatu zion. Haize bolada epel batek talko hauts fin-finez estali zuen. Lababo ertzeko txorrota

txikiei eragitea besterik ez zuen, zortzi lurrin eta kolonia ur ezberdin aukeran edukitzeko. Leninak ezkerreko hirugarrena ireki zuen, Txipreko lurrinez usaindu zen, eta zapatak eta galtzerdiak eskuan zeramatzala, masaia tresnarik libre zegoen ikustera irten zen.

Eta sukaldea zatarra zen oso, nola psikikoz hala fisikoz. Psikikoz untxi zulo bat zen, zimaurtegi bat, elkarrekin bizi beharrez elkarrekin muturka beti, emozioen emozioez kirastua. Zenbat kutunkeria itogarri! Zenbat harreman arriskutsu, osasungaitz eta lizun familiakoen artean! Maniakoen moduan, amak ez zeukan beste ardurarik bere umeena baizik... nola kateme batek bere katakumeak, hala jagoten zituen bereak amak. Baina hizketan lekikeen katemeak bezala, «ene potxolo, ene potxolo» behin eta berriro esaten lekikeen kateme batek bezala. «Ene potxolo, o, neure bularrean dituela bere eskutxoak, bere gosea, eta atsegin hilkor eta paregabe hori. Ene potxolo loak hartu du azkenik, ene potxolo loak hartu du, esne tanta txuri bat dariola ezpainetan behera. Ene haurtxoa lo-lo dago...»

—Bai —esan zuen Mustafa Mondek, buruari eraginez—, arrazoiz ikaratzen zarete zuek.

—Norekin aterako haiz gaur gauez? —galdetu zuen Leninak. Masaiatik bueltan zetorren, arrosa bezain dizdiratsu, barrutik argituriko bitxi bat bezala.

—Inorekin ere ez.

Bekainak ere zimurtu zitzaizkion Leninari, zeharo harriturik.

—Aspaldion ez naun guztiz ondo aurkitzen —azaldu zuen Fannyk. Wels doktoreak Haurdunaldi Ordea hartzeko agindu zidanan.

—Baina hemeretzi urte baizik ez baititun! Lehenengo Haurdunaldi Ordea ez dun obligaziozko hogeita bat arte.

—Bazekinat hori, neska. Baina baditun pertsonak lehenago hartzea komeni zaienak. Wels doktoreak esan zidanan ni bezalako pelbis zabaldun neskatxa beltzaranek hamazazpi urterekin hartu behar dutela lehenengo Haurdunaldi Ordea. Beraz, bada, bi urteko atzerapena zekarkinat eta ez aurrerapena.

Bere armairu atea ireki eta goiko apaleko kutxa-erreskada eta anpulu etiketatuak seinalatu zituen. *«Corpus Luteum Jarabea»*. Leninak altu irakurri zituen bakoitzaren izenak. *«Obarina freskoa, garantizatua. Kadukatze fetxa: F.o. 632ko Abuztuak 1. Titi gingilen gurina: egunean hiru bider hartzekoa, jan aurretik, ur pixka batez. Plazentina 5 cm hiru egunik behin. (Zainazpikoa)...»*.

—Ui! —ikaratu zen Lenina—. Zainazpikorik ez zaidan batere gustatzen! Hiri?

—Neroni ere ez. Baina geure onerako direnean...

Zentzu aparteko neskatxa zen Fanny.

Gure Ford —edo Gure Freud, berak arrazoi ezkuturen bategatik deitzea erabaki zuen bezala psikologiako gaiez mintzo zenean—, gure Freud izan zen familia bizitzako arrisku izugarriak agerrarazi zituen lehenengoa. Mundua gurasoz beterik zegoen eta, beraz, miseriaz beterik. Amaz beterik zegoen, eta, beraz, perbertsio era guztiez beterik, sadismotik kastitateraino. Neba-arrebaz eta osaba-izebaz beterik zegoen, eta, beraz, zorotasunez eta suizidioz beterik.

—Eta hala ere, Samoako basatien artean, Ginea Berriko kostako uharte batzuetan...

Eguzki tropikalak ezti beroak bezala dizdiz egiten zuen, hibisko loretzan, denak nahas, ijutika zebiltzan nes-

ka-mutiltxoen gorputz biluzien gainean. Palma orrizko teilatudun hogei etxeetako edozeinetan zegoen sukaldea. Trobiand uharteetan, ernaltzea arbasoen izpirituen lana zen. Inork ez zuen entzun ere inoiz «guraso» izenik.

—Ertzak elkar jotzen daude —esan zuen Inspektoreak—, zeren izan ere, elkar jotzeko eginak baitira.

—Wels doktoreak zion hiru hileko tratamendua hartzen badut Haurdunaldi Ordeaz, hemendik hiru lau urtetara osasuntsu nagokeela berriro.

—Zuzen egongo ote dun horretan —esan zuen Leninak—. Baina, aizan, Fanny, benetan al dion hiru hilabete hauetan ezingo dunala zera...?

—Bai zera, neska, inola ere ez! Bi edo hiru aste bakarrik eta kito. Klubean iragango dinat gaua, Bridge Musikalera jokatuz. Baina hi aterako haiz, ez?

Leninak baiezkoa egin zuen buruaz.

—Norekin?

—Henry Fosterrekin.

—Berriro? —Fannyren ilargi aurpegi amultsua harriturik geratu zen, samin eta gaitzespen airea harturik—. Ez al da egia izango *oraindik* ere Henry Fosterrekin habilela?

Aita-amak, neba-arrebak. Baina bazen senarrik, emazterik, maitalerik ere. Bazen monogamia eta erromantizismoa ere.

—Zuek ez duzue, nonbait, jakingo zer diren gauza hauek —esan zuen Mustafa Mondek.

Ikasleek ezezkoa egin zuten.

Familia, monogamia, erromantizismoa. Dena zen esklusibismoa, dena zen interesen pilatzea, dena zen berezko bultzadaren eta energiaren zuzendu beharra.

—Egia, ordea, zera da: mundu guztia mundu guztiarena dela —amaitu zuen Inspektoreak, esaera hipnopedikoa aipatuz.

Ikasleek oraingoan baiezkoa egin zuten enfasi handiz, ilunetako hirurogeita bi mila entzunaldik segurtzat ezezik, axiomatzat, ageri-ageritzat, duda ere ezinekotzat onarrarazi zien afirmazioa baieztaturik.

—Beno, nolanahi ere —ihardetsi zion Leninak—, lau hil bakarrik ditun Henryrekin nabilela.

—Lau hil bakarrik! Ederki! Eta txarrena da —jarraitu zuen Fannyk, hatz salatariz seinalatzen zuelarik—, txarrena da, denbora guzti honetan ez dunala hire bizitzan Henryz aparte beste inor eduki. Ez al dun egia?

Lenina gorri-gorri jarri zen kolpera. Baina haren begiak eta ahoskera desafioka zerraizkion bere lagunari.

—Ez, inor ere ez —erantzun zuen gogorki—. Eta ez zekinat zergatik behar nuen ere besterik inor iduki.

—Bapo! Neskatoak ez omen zekin zergatik! —berresan zuen Fannyk, Leninaren sorbalda ezkerraren osteko entzule ezkuturen bati mintzatuz bezala. Bere ahoskera kolpera aldatuz gaineratu zion—: Benetan ere kontuz ibili behar hukeela uste dinat. Oso gaizki zegon beti gizon berarekin ibiltzea horrela. Berrogei edo berrogeita bost urterekin, tira... Baina *hire* edadean, Lenina... Ez, inola ere ez. Gainera hik ondo dakin I.E.Z.k zeharo debekatuak dituela zer biziegi edo luzeegiak...

—Pentsa ezazue ura presioan daraman hodi bat —ikasleek pentsatu zuten—. Egin dezagun zulo bat —esan zuen Inspektoreak—. Bai zurrustada ederra!

Zulatu hogei lekutatik eta horra hogei iturritxo ziztrin.

«Ene semetxo, ene semetxo...»

«Ama».

Zorotasuna itsaskorra da.

«Ene maite, ene maite bakar, pinpirin, pinpirina...».

Ama, monogamia, erromantizismoa... Iturria txit goi jaiotzen da; txurrustada amorrazioz, apartsu ateratzen da. Beharrak irtenbide bakarra du. Ene maitetxo, ene semetxo! Ez da harritzekoa premoderno gizagaixo haiek zoraturik egotea eta dohakabe arlote hutsak izatea. Haien munduak ez zien gaixoei uzten gauzak patxadan hartzen, ez zien uzten zentzudun, bertutetsu, zoriontsu izaten. Hainbeste amaz eta maitalez, obeditzeko egokitu gabe zeuden hainbeste debekuz, hainbeste tentazioz eta bakarreko arrenkuraz, hainbeste eritasunez eta samin etengabez eta isolatzailez, ez da harritzekoa gauzak hain biziki sentitzea. Eta hala sentituz gero (are txarrago oraindik, bakardadean, itxaropenik gabeko isolamendu indibidualean) nola zitezkeen orekatuak izan?

—Ez daukan, ez, bertan behera utzi beharrik. Baina noizik behin atera hadi besteren batekin ere. Aski dun hori. Bera ere ibiltzen dun beste neskato batzuekin, ez al da egia?

Lenina konforme zegoen.

—Jakina, bada. Henry Foster gizon-gizona dun, gizalegetsua beti. Gainera pentsa ezan zuzendariarengan. Badakin zer pirria den...

Buruaz baiezkoa eginik, Leninak esan zuen:

—Gaur arratsaldean xaflada bat eman zidan ipurdian.

—Ikusten? —Fanny harro ageri zen—. Horra zerk axola dion gehien. Konbentzionalismo hutsa.

—Egonkortasuna —esan zuen Inspektoreak—, egonkortasuna. Ez dago zibilizaziorik egonkortasun sozial ga-

berik. Eta ez dago egonkortasun sozialik, bakarkako egonkortasun gaberik.

Turutak bezala hots egiten zion ahotsak. Hari aditzean, ikasleak handitzenago eta gartzenago ziren. Makinak jira eta bira dihardu, eta jiraka ekin behar dio beti. Gelditzen baldin bada, heriotza da. Mila milioi zebiltzan arrastaka lurrean. Gurpilak jiraka hasi ziren. Ehun eta berrogeita hamar urtetan bi mila milioiraino iritsi ziren. Geldi gurpilak oro. Ehun eta berrogeita hamar asteren buruan, berriro mila milioi bakarrik. Milaka eta milaka gizon eta emakume goseak hil ditu.

Gurpilek jiraka ekin behar diote beti, baina ez itsumustuan. Gizonak behar dira kargu har diezaieten, gurpilak berak beren ardatzetan bezain gizon seguruak, gizon zentzudunak, esanginak, egonkorrak beren poztasunean. Hoska ari badira: «Ene semea, ene ama, ene maite bakarra»; marmarka ari badira: «Ene bekatua, ene Jainko beldurgarria»; saminez oihuka ari badira, sukarrez hiltzear badaude, zaharraren zaharrez eta ezerezaren ezerezez sufritzen badaude... nola arraio behar diete gurpilei kargu hartu? Eta gurpilei kargurik ezin hartzekotan... komeriak leudeke milaka eta milaka eta milaka gizon eta emakumeen gorpuak ehorzten edo erretzen.

—Eta nolanahi ere —Fannyren ahotsa urrungari jarri zen—, zer du txarrik edo desatseginik beste bi edo hiru gizon edukitzeak, Henryz gainera? Hauek oro kontuan, nahasitxoago behar huke ibili.

—Egonkortasuna —ekin zion Inspektoreak—, egonkortasuna. Lehenengo eta azkenengo beharra. Egonkortasuna. Hortik dator guztia.

Esku mugimendu batez lorategiak seinalatu zituen, Egokitegiko edifizio larria, haurrak biluzik, hostotzan erdi ezkutatuak edo larrerik larre korrika.

Leninak ezezkoa eragin zion buruari.

—Ez zekinat zergatik —esan zuen ahopean—, baina aspaldion ez zeukanat gogo handirik nahasterako. Batzuetan ezin. Hik, Fanny, ez al dun inoiz honelakorik sentitu?

Fannyk baietz esan zion atsegintsu eta ulerkor.

—Baina ahalegindu egin behar dun —esan zuen sententzia gisa—. Parte hartu behar dun jokoan. Nolanahi ere, mundu guztia mundu guztiarena dun.

—Bai, mundu guztia mundu guztiarena dun —berresan zuen Leninak geldiro-geldiro. Eta hasperen eginik, isilik geratu zen pixka batean. Gero Fannyri eskutik oraturik, estutu egin zion pixka bat—. Arrazoi osoa daukan, Fanny. Beti bezala. Ahaleginduko naun.

Bultzada hertsiek gainez egiten dute, eta gainezte hori da sentimendua, gainezte hori da grina, gainezte hori da zorotasuna ere. Korrontearen indarrean, eta dikearen altueran eta eusmenean dago gorabehera. Bidean oztoporik aurkitzen ez duen korrontea bare-bare doa kanal predestinatuetan behera, zorion lasaia emanez.

Enbrioia gose da. Egunik egun, odol artifizialaren bonba jiraka ari da minutuko zortzirehun erreboluziotan. Haur dekantatuak negar egiten du; berehalaxe datorkio inudea kanpoko sekreziodun ontzi batez. Sentimenduak ugaritu egin ohi dira desiratzetik burutzera bitartean. Labur ezazue bitarte hori, bota itzazue ezertarako ez diren dike zahar horiek.

—Zorioneko mutilak zuek! —esan zuen Inspektoreak—. Ez zitzaion begiratzen ere nekeari zuen bizitzak

errezak zitezen emozioz; ahal guztiak egin ziren zuek emozio guztietatik jagotearren.

—Ford bere gurditzarrean dago! —marmartu zuen I.E.Z.k—. Dena dabil ondo munduan.

—Lenina Crowne? —esan zuen Henry Fosterrek, Predestinatzaile Ordearen galdera berresanik eta galtzetako kremailera ixten zuelarik—. Neskatxa bikaina duk. Izugarri pneumatikoa. Harritzen nauk hik ez duala oraindik heurea egin.

—Benetan ere ez zekiat nola izan den —esan zuen Predestinatzaile Ordeak—. Baina harrapatuko diat hurrengo aukeran.

Zegoen lekutik, Jantzitegiko nabearen beste ertzetik, Bernard Marxek den-dena entzun zien eta zurbilik geratu zen.

—Egia esateko —esan zuen Leninak—, aspertzen hasita negon gaur eta bihar Henry besterik ez edukitzeaz. —Ezker oineko galtzerdia jantzi zuen—. Ezagutzen al dun Bernard Marx? —galdetu zuen ezaxola airez, baina bistan zeukan asko axola zitzaiola.

Fannyk harriturik begiratu zion.

—Ez didan ba esango…

—Zergatik ez? Bernard Alfa-Gehiago bat dun. Gainera Basatien Erreserba batera berarekin joateko eskatu zidanan. Beti izan dinat Basatien Erreserba bat ikusteko gogoa.

—Baina… duen fama txarra zer?

—Bost axola zaidan niri zer fama duen.

—Ez omen zaion Oztopo Golfa gustatzen.

—Omen, omen… —esan zuen txantxaz Leninak.

—Gainera ia denbora guztia bakarrik ematen din, bakar-bakarrik.

Fannyren ahotsari izuikara zerion.

—Beno, dena dela, ez legoken bakarrik nirekin dagoela. Ez zekinat zergatik hartzen duen hain gaizki mundu guztiak. Niri behintzat asko gustatzen zaidan.

Irribarre egin zuen bere baitan. Zer lotsa absurdoa ageri zuen Bernardek berarekin? Ia ikaraturik zegoen gaixoa, neskatxa Munduko Inspektorea bera balitz bezala eta hura mekaniko Gamma-Gutxiago bat.

—Gogora zaitezte nor bere gustoez —esan zuen Mustafa Mondek—. Aurkitu al du inoiz zuetariko inork menpera ezineko oztoporik?

Ezezko isiltasuna izan zen galdera honen erantzuna.

—Aurkitu al da inoiz zuetariko inor luzez itxaron beharrean, desiratzetik lortzera bitartean?

—Bada, nik iii... —hasi zen esaten mutil bat, eta dudan jarri zen.

—Mintza hadi —esan zion I.E.Z.k—, ez ezak Bere Fordtasuna zain eduki.

—Bada, nik, behin batez, lau aste itxaron behar izan nuen desiratzen nuen neskatxak berarekin irteten utzi arte.

—Eta sentitu al huen halako emozio gogorrik?

—Izugarria!

—Izugarria, horixe noski —esan zuen Inspektoreak—. Gure arbasoak hain genituen tentelak eta ikusmen laburrekoak, non lehenengo erreformariak agertu eta emozio izugarri hauetatik askatzea eskeini zietenean, ez baitzieten jaramonik egin.

Haragi puska bat balitz bezala mintzo dituk neskatxa honetaz. —Hortzak karraskatu zituen Bernardek—. Behin

frogatua dudala, behin frogatzeko dudala. Arkume bat balitz bezala. Arkume baten pare jartzen diate, ez gorago ez beherago. Pentsatuko zuela esan zidan berak, eta aste honetantxe erantzungo zidala. O, Ford, Ford, Ford!

Haiengana joan eta kristorenak emateko gogoa zuen.

—Benetan ere, froga dezaala aholkatzen diat —zioen Henry Fosterrek.

—Har dezagun Ektogenesia. Pfitznerrek eta Kawaguchik honen teoria osoa landua zuten. Baina, Gobernuek jaramonik mendreena egin al zieten horregatik? Bai zera. Bazen kristautasuna zeritzan gauza bat. Eta emakumeak erditzaileak izaten segitzera behartuak izan ziren.

—Itsusiago dun, itsusiago! —esan zuen Fannyk.

—Niri, ordea, gustatzen zaidan haren tankera!

—Hain *kaxkarra* gainera!

Fannyk keinu bat egin zuen. Izan ere, kasta apalei zegokien estatura txikia.

—Nik behintzat oso sinpatiko aurkitzen dinat —esan zuen Leninak—. Bazeukanat hura mimatzeko gogo bat! Konprenitzen al dun? Katutxo bat bezala mimatzeko.

Fanny harriturik eta haserreturik zegoen.

—Deskuidoren bat izan omen zinan norbaitek, artean enbasaturik zegoela. Gamma bat zelakoan, alkohola sartu omen zionan odol artifizialaren errazioan. Horrexegatik dun hain kaxkarra.

—Lelokeriak! —Lenina sutan zegoen.

—Lotan irakastea debekaturik zegoen Ingalaterran. Bazen han Liberalismoa zeritzan halako zerbait. Parlamentuak, jakingo ahal duzue zer zen, lege bat onetsi zuen irakaskuntza hura debekatzeko. Grabaketak gorde egin ziren. Anitz hitzaldi izan zen askatasunari buruz. Alferreko

eta zorigabe izateko askatasuna. Zulo koadratuan ziri biribil izateko askatasuna.

—Bai pozik ere, ene lagun maitea. Hago ziur. Poz handiz gainera. —Henry Fosterrek bizkarrekotxo batzuk eman zizkion Predestinatzaile Ordeari—. Nolanahi ere, mundu guztia mundu guztiarena duk.

«Ehun berresaldi, astean hiru gauean, lau urtetan zehar —pentsatu zuen Bernardek, hipnopediako espezialista baitzen—. Hirurogeita bi mila eta larehun berresaldik egia bat osatzen dute. Astotzarrak!

—Edo kasten sistima, bestela. Hamaika aldiz proposatua eta hamaika aldiz baztertua. Demokrazia zeritzana zuten orduan. Gizonak fisika-kimikaz gainera ere berdinak balira bezala.

—Beno, bakar-bakarrik esan dinat onartzekoa dela haren gonbidapena.

Bernardek gorroto zituen, bihotzez gorroto ere. Baina bi ziren, altuak eta sendoak gainera.

—Bederatzi Urteko Gudua F.o. 141ean hasi zen.

—Odol artifizialean alkohola jarri ziotela egia balitz ere…

—Fosgenoa, kloropikrina, etil iodoazetatoa, difenilzianoartsina, triklorometil kloroformatoa, dikloroetil sulfuroa, eta zer esanik ez azido hidrozianikoa.

—Baina nik, jakina, ez dinat horrelakorik sinetsiko —bukatu zuen Leninak.

—Hamalau mila abioi burrunbaka zihoazen formazio irekian. Baina Kunfürstendam-en eta Zortzigarren Distri-

tuan, antrax bonben leherketek ez zuten danbarrada handiagorik ateratzen paperezko boltsatxo batek baino.

—Basatien Erreserba bat ikusteko gogoa daukadalako.

—CH3 C6H2 (NO2)3 + Hg (CNO)2) = Zer? Zulotzar handi bat lurrean, igeltsu piloa, haragi eta muki puskak; hanka bat, bota jantzita oraindik hegan doa airean zehar eta, blasta!, lurrartzen du geranio artean, geranio gorri artean... Hura zen lorearen lorea uda hartan!

—Ez daukan erremediorik, Lenina. Hor konpon, alferrik dun hirekin.

—Errusiarren teknika urak kutsatzeko txit zuhurra zen.

Elkarri bizkar emanik, Fanny eta Lenina janzten ari ziren, biak isilean.

—Bederatzi Urteko Gudua, Ekonomiaren Hondamendia. Bietatik bat hautatu behar zen: Munduaren menperatzea edo Munduaren desegitea. Egonkortasuna edo...

—Fanny Crowne ere neskatxa bikaina duk —esan zuen Predestinatzaile Ordeak.

Haurtegietan Klase Sozialen Kontzientziako ikasgaia bukatua zen, eta orain deiadarka ari ziren geroko eskaria sortaraziz geroko eskaintza industrialerako. «Zer poza hegan egitea —marmartzen zuten—, zer poza hegan egitea. Zer poza soineko berriak edukitzea, zer poza...»

—Liberalismoa, jakina, antraxak hil zuen. Baina gauzak ez daitezke indarrez egin.

—Ez, ordea, Lenina bezain pneumatikoa. Ezta gutxiagorik ere.

—Baina soineko zaharrak txit itsusi dira —zerraion esaka murmurio aspergaitzak—. Guk soineko zaharrak jaurtiki egiten ditugu beti. Hobe da jaurtikitzea adobatzea baino, hobe da jaurtikitzea...

—Gobernatzea legegitea da, ez jotzea. Eta zerebroaz eta ipurdiaz gobernatzen da, inoiz ere ez ukabilez. Esaterako kontsumitzea obligazio zen, obligaziozko kontsumoa...

—Ea, prest negon —esan zuen Leninak; baina Fannyk isilik zirauen, bizkar emanik—. Aizan, Fanny, egin ditzagun bakeak.

—Gizonak, emakumeak eta haurrak oro urtean honenbesteko bat kontsumitzera beharturik zeuden. Industriaren onerako. Ondorio bakarra...

—Hobe da jaurtikitzea adobatzea baino. Zenbat eta adobatze gehiago, hainbat eta diru gutxiago. Zenbat eta adobatze gehiago...

—Usterik gutxienean —esan zuen Fannyk samin airea—, nahaste ederrean sarturik hagoke.

—Denak zeuden kontra amorruz: ez zela eta ez zela kontsumitu behar. Buelta berrino Naturara.

—Utzi bertan behera kultura. Ezin duzu kontsumitu, eseri eta liburuak irakurtzen ari baldin bazara.

—Zer poza hegan egitea, zer poza hegan egitea.

—Ondo al nago? —galdetu zuen Leninak. Azetato berdezko jaka bat zeraman, lika berdezko lepoz eta eskuturrez.

—Zortzirehun Izaki Aruntен istilua metraileten indarrez amaitarazia Gorlers Green-en.

—Hobe da jaurtikitzea adobatzea baino.

—Horra gero British Museumeko hilketa. Bi mila kulturazale fanatiko dikloretilen sulfuroz gaseztatuak izan ziren.

Jockey berde zurizko txanotxo batek gerizatzen zizkion begiak Leninari. Zapata berde biziak eta txit distiratsuak zituen.

—Noizbait —esan zuen Mustafa Mondek—, konturatu ziren Inspektoreak indarrez ez zegoela zer eginik. Metodo geldiagoak, baina mila bider seguruagoak behar ziren: hala Ektogenesia, New-Paulov Egokitzea, Hipnopedia...

Eta gerri bueltan larru berdezko kartutxontzi bat zeraman Leninak, zilarrez bildua eta antisorgailuz bete-betea (zeren Lenina ez baitzen neutroa).

—Azkenez Pfitznerren eta Kawaguchiren aurkikuntzak erabili zituzten. Umegintzaren kontra egundoko propaganda...

—Primeran —hots egin zuen Fannyk, liluraturik. Ez zegoen Leninaren xarmari luzaz eustekorik. Hura gerriko Malthustar polita!

—Era batera lehenaren kontrako kanpaina: museoak itxi, monumentu historikoak eraitsi, (zorionez gehienak lehendik deseginak zeuden Bederatzi Urteko Guduan); F-ren aurretik argitaraturiko liburu guztiak erretiratu...

—Inondik ahal bada, neuk ere horrelakoxe bat lortu behar dinat —esan zuen Fannyk.

—Bazen, esaterako «Piramideak» izeneko zerbait.

—Nire txarolezko gerriko zahar honek...

—Bai eta Shakespeare zelako tipo bat ere. Zertan esanik ere ez, jakina, zuek ez duzuela inoiz honelakorik entzun.

—Ez din ezertarako balio.

—Hona hemen heziketa benetan zientifikoaren abantailak.

—Zenbat eta adobatze gehiago, hainbat eta diru gutxiago; zenbat eta adobatze gehiago…

—Gure Forden lehen Modelo T-ren sarrera…

—Baditun hiru hilabete soinean daramadala…

—…hautatu zuten Aro berriaren hasieratzat.

—Hobe da jaurtikitzea adobatzea baino; hobe da jaurtikitzea…

—Bazen zerbait, lehen esan dizuedanez, Kristautasuna zeritzana.

—Hobe da jaurtikitzea adobatzea baino.

—Aspikontsumoaren morala eta filosofia…

—Zer poza soineko berriak jaztea, zer poza soineko berriak janztea, zer poza…

—Behar-beharrezko ziren subprodukzio denboran. Baina makina aroan eta behin nitrogenoa finkatuz gero, krimen garbia gizarterako.

—Henry Fosterrek erregalatu zidanan.

—Gurutze guztiei goia moztu zieten eta T bat bezala geratu ziren. Bazen Jainkoa zeritzan zerbait ere.

—Tafiletearen imitazio garbia dun.

—Orain Estatu Mundiala daukagu. Eta Forden eguneko jaiak, eta Elkar-Kantak eta Elkar-Zerbitzuak.

«O Ford! zer gorroto diedan!», pentsatzen zuen Bernard Marxek.

—Bazen zerbait Zerua zeritzana; hala ere alkohol edale porrokatuak ziren!

«Haragia bezala; haragia balitz bezal-bezalaxe.»

—Bazen zerbait «arima» zeritzana eta beste zerbait «hilezkortasun» zeritzana.

—Galde iezaion Henryri ea non lortu zuen.

—Baina morfina eta kokaina hartzen zituzten.

«Okerrena duk, berriz, bera dela aurrena bere burua haragi soiltzat hartzen duena.»

—F-ren 178an bi mila farmakologo eta biokimiko subentzionatu zituzten...

—Umore txarreko dagoela ematen dik —esan zuen Predestinatzaile Ordeak, Bernard Marx seinalaturik.

—Eta handik sei urtetara merkatuan zebilen droga perfektua.

—Zirika dezagun mutil hori.

—Neskatxa euforikoa, narkotikoa, goxoro liluragarria.

—Triste samar hago, Marx —eman zion bizkarrekoak ikaratu egin zuen. Jaso zituen begiak. Henry Foster astotzar hura zen—. Soma gramotxo bat behar duk.

—Kristautasunaren eta alkoholaren on guztiak; eta haien txarrik batere ez.

«O Ford; jo eta garbituko hinduket!». Baina «ez, eskerrik asko» esan zuen bakarrik, eskaini zion pastila tuboa ukatuz.

—Gogoak ematen dion guztian har ditzake batek bakazioak errealitatetik, eta buruko minik eta mitologiarik batere gabe itzuli berriro.

—Har ezak, gizona, har ezak —ekin zion Henry Fosterrek.

—Egonkortasuna ia finkaturik geratu zen honela.

—Zentimetro kubiko battok hamar tristura kentzen dizkik —esan zuen Predestinatzaile Ordeak, hipnopedia jakinduriako esaera bat aipaturik.

—Zahartzea menderatzea bakarrik falta zen.

—Pikutara hemendik! —hots egin zuen Bernardek.

—Mutil! Bai zirin hagoela gero!

—Hormona gonadalak, odol gaztearen transfusioa, magnesio-gatzak...

—Eta pentsa ezak gramo bat hobe dela dioskada bat baino. —Eta biak barrezka atera ziren.

—Eta hona zahartzearen arrastorik ere ez dela geratzen. Eta gainera...

—Ez ahaztu gero gerriko malthustarren zera Henryri galdetzea —esan zuen Fannyk.

—Eta gainera zaharren bereiztasun mental guztiak ere abolituak betiko. Bakoitzaren izaerak beti bat bera dirau bizitza guztian zehar.

—...Oztopo Golfean bi partidu jokatu behar ditinat oraindik ilundu aurretik. Banihoan.

—Lana, jolasak... Hirurogei urterekin kemen berdin-berdinak ditugu, nola hamazazpirekin. Antzina zaharrak erretiratu egiten ziren, erlijiora jotzen zuten, irakurtzeari ematen zioten edo pentsaketan pasatzen zuten denbora. Pentsaketan!

«Tentel alu madarikatuok!» zioen berekiko Bernardek, pasiluan zehar azentsorerantz zihoala.

—Gaur egun, ordea, pentsa nolako aurrerapena dugun, zaharrek ere lan egiten baitute, eta ez daukate denborarik ez hutsarterik atseginez bete ez dezaketenik; ez daukate mementu batto ere jezarrita egoteko edo pentsaketan iharduteko. Eta inoiz, zoritxarrez, beren distrakzioen mami giharrean denbora arrailik agertuko balitz, hor dute soma, soma eztia. Gramo erdia arratsalde libre bat bezala da, gramo bat asteburu bat bezala, bi gramo Ekialde ederrera joan-etorri bat bezala, eta hiru gramo ilargian betiere ilun bat egitea bezala. Eta arrail hura atzean utzi ondoren, berriro itzultzen dira sendo eta tinko, eguneroko lan-jolasen lur gotorrera: nahi adina sentsorama, nahi adina neskatxa pneumatiko, nahi adina Golf Elektromagnetikoko kanpo...

—Kanpora, neskato! —hots egin zuen haserrez I.E.Z.k—. Kanpora mutiko! Ez al dakusazue Inspektorea lanpeturik dugula? Alde hemendik beste norabait zeuen jolas erotikookin!

—Haurtxo gaixoak! —esan zuen Inspektoreak.

Geldiro eta maiestatez, makinen furrunda leunez, trenak bazihoazen aurrera, orduko hirurehun eta berrogeita hamar milimetroan. Ilunbe gorrixka hartan konta ezin ahala errubi zeuden dizdizka.

# LAUGARREN KAPITULUA

## I

Azentsorea Alfa Jantzitegitik zetozen gizonez beterik zegoen, eta Lenina sartzean, ondo etorrika eta irribarre atseginez hartu zuten. Neskatxa txit popularra zen, izan ere, Lenina, eta behin edo behin, ia guztiekin zuen gauren bat edo beste iragana.

«Bai mutil bikainak», zioen bere baitan Lenina Crownek, haine agurrei erantzunez. «Bai mutil maitagarriak!» Hala ere, nahiago zukeen George Edzel hain belarri-handi ez balitz. 328. metroan paratiroides tantaren bat gehiago eman ote zioten, bada? Eta Benito Hoover-i begiratzean, ezin zezakeen burutik kendu nolako iletza zuen arropak eranztean. Benitoren ile beltz kizkur haren oroipenez triste samarrik zituela begiak, buelta eman zuen eta han, zoko batean, Bernard Marxen gorpuzño kaxkarra eta begitarte melankolikoa ikusi zituen.

—Bernard! —hots egin zuen, harengana hurbildurik—. Bila nenbilkizun. —Haren ahotsa argi-argi entzun

zen azentsoreko zurrungaren gainetik. Besteek ere buelta eman zuten, zer ikusiko.

—Mexiko Berrirako dugun planaz hitz egin nahi nizun.

Betertzetik ikusi zuen nola Benito Hoover aho zabal geratzen zen harriduraz. «Egingo nuke beste behin berarekin joateko eskatuko diodan zain dagoela» esan zuen Leninak bere baitan. Gero ahots ozenez eta are ausartagoz jarraitu zuen:

—Zer pozik emango nukeen aste oso bat zurekin uztailean. —Nolanahi ere, publikoan erakutsi nahi zuen Henryrekikoak eginak zituela. Fannyk ere ontzat jo beharko, nahiz eta Bernardekin izan—. Ene desirarik baldin baduzu oraindik behintzat —bukatu zuen Leninak, irribarrerik xamurrenez eta adierazkorrenez begiratzen ziolarik.

Bernard gorri-gorri jarri zen. «Zergatik ote?», zioen Leninak harriturik, baina bai bihozbera ere, hainbesterainoko ahalmena zuela ikustean.

—Ez al litzaiguke hobe beste nonbait hitz egitea honetaz? —esan zuen hitz totelka Bernardek, estu eta larri zegoela.

«Itsuskeriaren bat esan al diot, bada?», pentsatu zuen Leninak. «Nekez jar zitekeen gizona larriago lizunkeriaren bat jaurtiki banio ere, edo ama nor duen edo horrelako zerbait galdetu banio ere».

—Nahi dut esan, zera... hemen dugun jendetzaz...

Ez zuen Leninak barre algara makala jaurtiki, sanoa eta maliziarik gabea noski.

—Xelebrea zaitugu gero! —esan zuen; eta benetan ere xelebre zeritzan—. Inola ere, abisatuko al didazu aste bete aurretik bederen —jarraitu zuen beste tonu batez—.

Pazifikoko Kohete urdina hartuko dugu, ezta? Charing-T dorretik ala Hampsteadetik ateratzen da?

Bernardek erantzun ahal baino lehen, azentsorea gelditu egin zen.

—Azotea! —oihukatu zuen ahots zorrotz batek.

Azentsorelaria tximino antzeko gizontxo bat zen, eta Epsilon-Gutxiago erdi ipotxen tunika beltzez jantzirik zegoen.

—Azotea!

Azentsorelariak zabaldu zituen ateak eta arrats erdiko eguzki sargoriaren argi biziak atzerantz eragin zion, begiak keinuka ari zitzaizkiola.

—Hona azotea! —berresan zuen konkorturik bezala. Kolpera eta bozkarioz, lozorro itzaltsu eta sorkor batetik iratzarri berri zela ematen zuen—. Azotea!

Jaso zuen burua halako txakur begirune urduriz eta irribarre egin zien bere pasajeroei.

Honetan txirrin batek jo zuen, eta azentsorearen sabaitik bozgorailu bat hasi zen leunki, baina bai gogorki ere, aginduak ematen.

—Behera —esan zuen—. Behera. Hamazortzigarren pisua. Behera. Hamazortzigarren pisua. Behera, behe...

Azentsorelariak brasta itxi zituen ateak, botoi bati eman zion eta berehalaxe murgildu zen berriro azentsoreko argi nabarrean, bere ohiko harriduraren argi nabarrean.

Azotean argi eta bero egiten zuen. Udako arratsalde hura bibraka ari zen, airerik aire zebiltzan helikopteroen joan-etorriaz. Zeru distiratsuan zehar ikusgaitz eta tximistaka zihoazen aire-koheteak; haien ron-ronketa astuna lausengu bat bezalatsukoa zen aire leunean.

Bernard Marxek hasgorapen sakon bat egin zuen. Jaso zituen begiak gorantz, horizonte urdinerantz begiratu zuen ondoren eta Leninaren aurpegira azkenez.

—Bai ederra ere!

Ahotsak dardartxoa egiten zion.

—Sekulako eguraldia Oztopo Golferako —erantzun zuen Leninak—. Eta orain agudo joan beharra dut, Bernard. Henry haserretu egiten zait, zain egonarazten badut. Abisa iezadazu garaiz eguna.

Eta, eskuari eraginik, Leninak alderik alde pasa zuen azotea zabala, aterpeetarantz. Bernard begira-begira geratu zitzaion: haren galtzerdi zurien keinuketa iheskorra, haren belaun beltxaranak, behin eta berriz toleskatzen zirenak arineketan, eta haren panazko galtza labur estuen ondulazio fina, jaka berde botilaren azpian. Bernarden aurpegiari samin airea zerion.

—Neskatxa polita benetan! —esan zuen bere atzean ahots sendo alai batek.

Bernard ikaraturik bihurtu zen. Benito Hoover-en aurpegi potolo gordinak irribarrez begiratzen zion goitik, txera handiko irribarrez. Mundu guztiak zekien Benito adiurre txit onekoa zela. Jendeak zioenez, bizitza osoa pasa omen zezakeen somarik ezertarako hartzeke. Beste guztiek bakazioak hartu beharra zuten maliziatik eta umore txarretik apartatzeko. Hari, ordea, ez zion horrek buruhausterik ematen. Benitok errealitatea alai eta irribarretsu zekusan beti.

—Pneumatikoa gainera! Eta nola gero! —Ondoren beste tonu batez jarraitu zuen—: Baina, aizak, melankoliko xamar hagoela esango nikek. Soma gramotxo bat behar duk hik. —Galtzetako poltsiko ezkerra arakaturik,

fraskotxo bat atera zuen Benitok—. Zentimetro kubiko batek hamar tristura ken... Baina, hiii!

Bernard, kolpera buelta erdi emanik, korrika aldendu zitzaion.

Benito ere begira geratu zitzaion. «Zer deabru gertatzen ote zaio tipo horri?», galdetu zuen berekiko, eta buruari eraginik, mutilari odol artifizialean alkohola sartu ote zioten esamesak egiatzat hartzea erabaki zuen. «Zerebrora joko zioan nonbait». Gorde zuen berriro soma fraskoa, eta gomazko pakete mamurtzeko bat atera zuen, hormona sexualezkoa. Ahoratu zuen pastila bat eta, hura mamurtuz, aterpeetarantz abiatu zen.

Henry Fosterrek aterpetik aterea zeukan ia bere aparatua, eta, Lenina iristean, piloto kabinan eserita zegoen, zain.

—Lau minutu beranduago —ez zuen besterik esan.

Motorrak martxan jarri zituen eta helikopteroaren manduei eragin zien. Aparailua bertikal igo zen airean gora. Henryk azeleratu zuen; helizearen zurrunga mehetu zen, kakalardotik erlera, eta erletik eltxora pasaturik. Belozimetroak markatzen zuenetik, minutuko ia bi kilometroan zihoazen gorantz. Londres igonago eta txikiago geratzen zitzaien oinpean. Segundu gutxian, teilatu laudun edifizio larriak ontto-sail geometriko bat ematen zuten parke eta lorategi berdeetan. Erdi-erdian txorten luzeko ontto eder bat ageri zen, Charing-T-ko Dorrea, zementu armatuzko disko distiratsu bat jasotzen zuelarik zerurantz.

Kondairetako atleten bizkar lanbroen antzo, hodeitzar haragitsuak zeuden zeru urdinean kulunka, beren buruen gainean. Honetan eltxo gorri bat atera zen haietariko batetik, zurrun-zurrunka eroriz.

—Horra Astrountzi Gorria —esan zuen Henryk—, New Yorketik datorrena. Zazpi minutuko atzerapena darama —gaineratu zuen—. Lotsagarria da zerbitzu atlantiko horien ordurik eza.

Kendu zuen oina azeleradoretik. Buru gainean zituzten palen zurrunga jaitsi zen zortziko t'erdi, erletik erlaminora pasatuz, eta hurrenez hurren, mandeulira eta kakalardora. Geldiarazi zuten aparatuaren goranzkoa. Mementutxo bat geroago, geldi-geldi zeuden, airean zintzilik. Henryk mugitu zuen palanka bat eta klaskada bat entzun zen. Geldiro lehenengo, bizkortxoago gero, aurrealdean zuten helizea jiraka hasi zen, laino biribil bat formatu arte beren begien aurrean. Abiadura horizontalak ateratako haizeak geroago eta txistu zorrotzagoa egiten zuen *estay*-etan. Henryk ez zion begirik kentzen erreboluzio kontagailuari. Orratzak mila eta berrehun seinalatzean, geldiarazi zuen helikopteroaren helizea. Aparatuak aurrerantz zeraman abiadura nahikoa zen, hego hutsez sostendurik hegan egiteko.

Leninak beherantz begiratu zuen, lurrean, bere oinetan zeukan leihoskatik. Londres Erditik lehenengo suburbio eraztunera bitartean zeuden sei kilometroko parkeen parean zihoazen hegan. Hango berdetasunak txingurrika zirudien bizitasunez, goitik begiratuta, kamusturik ematen zuen bizitasunez. Pilota Zentrifugoko dorre pilak dizdizka zeuden zuhaitz artean. Shepherd's Bush ondoan bi mila Beta-Gutxiago, bikote mistoetan, tenisean ari ziren Riemann-eko zelaietan. Notting Hill-etik Wilesden-erako kaminoaren hegaletan pilotaleku mugikor zerrenda bikoitz bat hedatzen zen. Earling-eko Estadioan Delten gimnasia eta koru-jaialdi bat ospatzen zen.

—Bai nazkagarria kaki kolorea! —esan zuen Leninak, bere kastako aurriritzi hipnopedikoak altu azaldurik.

Hounslow-ko Sentsorama-Estudioen eraikuntzek zazpi hektarea t'erdi hartzen zituzten. Handik hurrean langile armada beltz eta kaki bat lan eta lan ari zen, Mendebaldeko Kamino Nagusiari beiraldi berri bat emanez. Haien gainetik hegan iragatean, arrago erabilkor izugarri bat husten ari ziren. Harri urtua uholdeka hedatzen zen, goritasun itsugarriz, kamino azalean zehar. Amiantozko zapalgailuak joan-etorrian zebiltzan. Ureztatzeko kamioi ondo isolatu baten atzetik, baporezko laino zuriak gorantz zihoazen.

Brentford-en, Telebista Korporazioaren faktoriak hiri txiki bat ematen zuen.

—Txanda errelebatzen ari bide dira —esan zuen Leninak—. Afido eta txingurri antzo, hosto berde koloreko Gamma neskatxak eta mutil erdi-ipotx beltzak atari inguruetan zebiltzan, edo txanda zaintzen zuten nork bere eserlekua hartzeko tranbia errail-bakarretan. Mazusta koloreko Beta-Gutxiagoek joan-etorrika ziharduten jendarterik jendarte.

Handik hamar minutura, Stoke Poges-en zeuden, eta hasita zeukaten lehenego Oztopo Golfaldia.

## II

Bernardek begi-makur gurutzatu zuen azotea, edo alborantz begira deskuidoz inorekin topo egiten baldin bazuen bidean. Gizon pertsegitu bat zirudien, baina berak ikusi ere nahi ez zituen etsaiek pertsegitua, zeren ikustean, ondo baitzekien berak uste baino are etsaiago aurkitu-

ko zituela. Eta honek errudunago eta ezinbestean bakarrago ikusaraziko zion bere burua.

«Benito Hoover higuingarri hori!» Mutilak, ordea, ez zion asmo txarrik izan. Baina honek nolabait okerrago jartzen zituen gauzak. Maite zutenak, gorroto zutenak bezalaxe portatzen zitzaizkion. Leninak berak ere sufriarazten zuen. Bernard lotsaz oroitzen zen ez-mezean pasaturiko aste haietaz, zeinetan espero, desio eta etsi baitzuen ez zuela inoiz deklaratzeko adina kemen izango. Ausartuko al zen arbuiozko ezetz batek apaldua utz zezan arriskuan sartzera? Leninak baietz esan balio, ordea, hura zoramena! Horra, bada, Leninak emana ziola baietza, eta hala ere dohakabe sentitzen zen, dohakabe zeren Leninak uste izan baitzuen arratsalde hura sekulakoa zela Oztopo Golfean jokatzeko, dohakabe zeren korrika aldendu baitzitzaion Henry Fosterrekin batzeko, dohakabe zeren bera xelebretzat jo baitzuen ez zuelako nahi izan ezkutuko gauzak agirian eztabaidatzerik.

Hitz batez dohakabe zeren Lenina portatu baitzitzaion beste edozein neskatxa ingeles zindo eta bertutetsuk portatu behar zuen bezala, eta ez beste nolabait anormalki.

Bernardek ireki zuen bere aterpeko atea eta bi Delta-Gutxiago nagitsuri dei egin zien, aparailua azoteatik atera ziezaioten. Aterpeetako pertsonala Bokanowsky sail berekoa zen, eta gizonak bikiak ziren, denak kaxkarrak, beltzaranak eta itsusiak. Bernardek aire latz, gailen eta gordinez eman zizkien aginduak, bere nagusitasunaz ziurtasun handirik ez duen batek bezala. Bernardi txit gogor egiten zitzaion kasta beheragoko jendearekin tratatzea. Zena zela (eta odol artifizialean alkohola nahastu ziotelako marmarioak egiak zitezkeen beharbada, zeren akzidente bat litekeena baita noiznahi) Bernarden fisikoa ez zen Gam-

ma batena baino askoz hobea. Alfa Patroia baino zortzi zentimetro txikiagoa zen, bai eta argalagoa ere proportzio berdinez. Kasta beheragoko jendearekin tratatzeak bere kaskartasun fisikoa oroitarazten zion beti saminki. «Ni naiz ni, eta nahiago ez banintz». Kontzientzia txit zorrotza eta mingarria zuen bere buruaz. Delta bati goitik behera gabe bekoz beko zuzen begiratu behar ziola kargutzen zen bakoitzean, lur jota geratzen zen. Tratatuko ote zuen izaki hark bere kastari zegokion errespetuaz? Hura koska larria! Eta arrazoiz gainera. Zeren Gammak, Deltak eta Epsilonak egokituak izan baitziren apropos, nagusitasun soziala gorputzaren handi-txikian dagoela uste izateko. Denek zeukaten aurriritzi hipnopedikoa gorputz handikoen alde. Hortik zetozkion Bernardi, berak proposamendu egiten zien emakumeen irriak, hortik bere ideko lagunen adar jotzeak. Burla haiek arrotz sentiarazten zuten; eta arrotz sentiturik, halaxe ere portatzen zen; eta horra gero eta okerrago zihoala, zeren hala portatuz, gehitu egiten baitzitzaizkion bere akats fisikoek sorturiko arbuio eta etsaigoa. Eta honek, halaber, bakarrago eta arrotzago sentiarazten zuen. Beldurrez zegoen beti barre egingo ote zioten. Horregatik ihes egiten zien bere ideei, eta bere duintasunaren jabeegi ageri zen apalagoen aurrean. Zer inbidia garratza zien Henry Foster eta Benito Hoover bezalako gizonei! Halako gizonek inoiz ez baitzioten Epsilon bati oihu egin behar agindu bat bete zedin; euren posizioa gauza naturaltzat hartzen zuten; kasten sistema barrenean arraina uretan bezain aise mugitzen ziren, etxean baleude bezala sentitzen, erabat ahaztuz euren buruen kontzientzia, edo agian bizi ziren ingurugiro atsegin onuragarria.

Nagikeriaz eta gogogaitzez —edo hala zeritzan berak behintzat—, bikiek bazeramaten noizbait abioia azoteara.

—Agudo! —esan zuen Bernardek amorrazioz. Bi gizonetarik batek begirada bat jaurtiki zion. Zer burla zakar ote zen haren begi gris moteletan ageri zena?

—Agudo diotsuet! —hots egin zuen gogorrago.

Garrazpera higuingarria azaldu zitzaion ahotsean.

Igo zen abioira eta handik minutu batera, hegan zihoan Hegoalderantz, Ibai alderantz. Propaganda Ofizinak eta Emozio Ingeniaritzako Eskola hirurogei solairuko eraikuntza berean zeuden, Fleet Street-en. Sotoetan eta beheko solairuetan, Londresko hiru egunkari nagusien lantegi ofizinak zeuden: *«Orduoroko irratia»*, kasta goikoen egunkaria, *«Kazeta Gamma»*, berde zurbila, eta *«Delten Ispilua»*, papel kakiz inprimatua eta silaba bakarreko hitzez. Gero Propaganda Ofizinak zetozen, Telebistaz, Sentsoramaz eta Ahots Sintetikoz eta Musika Sintetikoz: hogeita bi pisu guztira. Hauen gainean azterkuntzarako laborategiak eta gela koltxatuak zeuden, non egiten baitzituzten beren lan bitxiak Hots Erregistratzaileek eta Musikagile Sintetikoek. Emozio Ingeniaritzako Eskolak betetzen zituen goragoko hamazortzi solairuak.

Bernardek Propaganda Etxeko azotean lurrartu zuen eta jaitsi zen bere aparatutik.

—Telefona iezaiok Mr. Helmholtz Watson-i —agindu zion Gamma-Gehiago atezainari—, eta esaiok Mr. Bernard zain dagokiola azotean.

Eseri zen eta zigarrotxo bat piztu zuen.

Helmholtz Watson idazten ari zen, abisua hartu zuenean.

—Esaiok berehalaxe noakiola —erantzun zuen, eta eskegi zuen entzungailua. Gero bere idazkari andereñoa-

renganantz itzulirik, ahots ofizial eta inpertsonal berdinez, jarraitu zuen—: zeure kontu nire gauzak erretiratzea.

Eta neskatxaren irribarreari ez-ikusi eginik, zutitu eta azkar abiatu zen aterantz.

Gizon puska galanta zen, bular eta bizkar zabala, sendoa, eta hala ere, azkarra, bizkorra eta zaulia mugimenduz. Burua ederki tajutua zeukan, bere lepohabe gogor eta ondo borobilduak eusten ziolarik. Ile beltz kizkurra zuen, aurpegikera txit markatua, gorpuzkera bortitza eta gailena. Lerdena zen oso, eta bere idazkariak esaten eta esaten zuenez, burutik beherainoko Alfa Gehiago egin-egina. Emozio Ingeniaritza Eskolako irakasle izanik (Idazketan), Emozio Ingeniari bezala betetzen zituen irakaskintzak uzten zizkion hutsarteak. *«Orduoroko Irratia»*rako idazten zuen aldizka, eta Sentsoramarako gidoiak egiten. Aparteko sena zeukan eslogan eta alleluya hipnopedikoetarako.

«Dakiena», horra bere nagusien iritzia. Eta buruari eraginka eta erdi ahopeka gaineratzen zuten: «Dakienegia beharbada».

Gehiegitxo, noski. Arrazoia zuten. Gaindidura mental batek antz-antzeko ondoriak zekarzkion Helmholtz Watson-i, nola gorputz eskasak Bernard-i. Hezur eta muskulo eskaseko izateak apartatu zuen Bernard bere lagunetatik, eta «aparte» sentitze hura —estandar arruntei buruz gaindidura mentala zena— gehiago apartatzeko bide zitzaion.

Buru argiegiko izateak eman zion Helmholtz-i bere buruaren eta bere bakardadearen kontzientzia latza. Eta horixe zeukaten bi gizonek elkarrekin, alegia, indibiduoak zirela konturatzea. Baina eskastasun fisikoak bizitza guztian zehar sentiarazi bazion Bernardi «aparteko» izate-

aren kontzientzia, Helmholtz Watson, ordea, ez zen oraintsu-oraintsu arte konturatu bere nagusitasun mentalaz eta, beraz, diferente zela besteengandik. Pista mugikorreko pilota txapeldun hura, maitale porrokatu hura (seirehun eta berrogei maite diferente eduki omen zituen lau urteren barruan), mundu guztiaz ederki konpontzen zekien komite-gizon harrigarri hura, hara non kolpe-kolpera kargutzen zen kirola, emakumeak eta aginpidea bigarren mailako zerak zirela beretzat. Beste zerbaitek ematen zion kezka. Zerk, ordea? Horixe zen, hain zuzen, Bernardek berarekin eztabaidatzeko zekarren prolema. Hobeki esateko —zeren Helmholtzek baitzeraman beti solasaren pisua—, Bernard entzutera zetorkion nola berak, beste behin ere, ekiten zion gaiari.

Ahots Sintetikozko Propaganda Ofizinako hiru neskatxa xarmangarri bidera atera zitzaizkion azentsoretik irtetean.

—Aizu, gure Helmholtz, zatoz gurekin Exmooreko landan afaltzera.

Hiruren erdian harturik zeukaten erreguka. Baina Helmholtz-ek buruari eragin eta hanka egin zien.

—Ez, inola ere ez.

—Zeu ez beste gizonik ez daramakegu.

Helmholtz-ek, ordea, ez zuen amore eman, hain promes tentagarria izanik ere.

—Ez —berresan zuen—. Lana daukat.

Eta aurrera jo zuen zirti-zarta. Neskatxak atzetik zihoazkion, eta ez zuten Bernarden abioira igo arte utzi. Eta nolakoak esanda gainera.

—Hauek lako emakumerik! —hots egin zuen, aparatua gorantz zihoala—. Hauek lako emakumerik! —buruari eraginez eta kopeta zimurtuz—. Beldurgarriak dituk!

Bernard, itxuraz, konforme zegoen honetaz, nahiz eta barrutik zer besterik nahiago Helmholtz-ek adina neska lagun eta hain erraz eduki ahal izatea baino. Eta harrokeriatxo hau jaurtiki zuen:

—Lenina Crownerekin Mexiko Berrira joatekotan nauk —esan zuen ezaxola airerik handienaz.

—Bai? —esan zuen Helmholtz-ek, haintzat ere hartzeke. Eta isilunetxo baten ondoren, jarraitu zuen—: aste bat edo bi dituk komite eta neskatxak bertan behera utzi ditudala. Ez dezakek asma ere nolako nahaspila atera duen honek Eskolan. Hala ere, merezi zuela uste diat. Ondorioak… —dudan jarri zen—. Beno, xelebreak dituk, oso xelebreak.

Eskastasun fisikoak halako gaindidura mental bat sortaraz dezake. Agi danez prozedura hau alderantziz ere gerta daiteke. Gaindidura mental batek ere sortaraz ditzake, bere xedeen onerako, bakardade deliberatuaren borondatezko itsutasun-gortasunak, asketismoaren ezintasun artifiziala.

Falta zitzaien hegaldia isilik egin zuten. Iritsi eta Bernarden gelako sofa pneumatikoetan eseri zirenean, Helmholtz-ek bere autuari ekin zion berriro.

Geldiro hitz eginez, galdetu zuen:

—Ez al duk inoiz sentitu bazela hire baitan zerbait, kanpora irteteko aukera noiz emango hion zain? Inoiz erabiltzen ez duan halako indar-goiti bat, turbinatik ez baina haitzartean behera erortzen den uraren antzekoa?

Eta galdezka begiratu zion Bernardi.

—Zeri buruz ari haiz? Gauzak bestela balira, batek senti litzakeen emozioei buruz?

Helmholtz-ek buruari eragin zion.

—Ez duk, bada, hori ere. Noizik noizera sentitzen dudan zer batetaz ari nauk, esateko inportanterik badudala eta esateko kapaz ere banaizela sentitzen dudan zerbaitetaz. Baina neuk ere ez baitakit zer den, ez zezakeat ene kapazidaderik enplega. Beste idazmodurik balego! Edo beste zertaz idatzirik... —Pixkatxo batean isilik egon zen, gero honela jarraituz—: esaldiak asmatzen oso abila nauk; orratz gainean eseri balitz bezala, bati salto eragiteko moduko hitzak aurkitzen dizkiat, hitz berriak eta ernagarriak, nahiz eta hipnopediaz argi dagoen zerbaiti ezarri. Baina hau ez zaidak aski. Ez duk aski esaldiak onak izan daitezen. Esaldi haiekin egiten denak ere ona izan behar dik.

—Baina hik idazten duana ona baduk, Helmholtz.

—Destinatuta dagoenerako bai, noski. —Bizkarrak jaso zituen—. Baina haren destinua, hain duk hutsa! Ez dituk gauza inportanteak. Eta nik zerbait inportanteagorik badezakedala sumatzen diat. Bai, eta zerbait biziagorik, zerbait bortitzagorik. Baina, zer? Zer inportanteagorik esan daiteke hemen? Eta nola arraio daiteke bortizki hitz egin edozeinek ezagun dituen gaiez? Hitzak, tajuz erabiliz gero, X izpiak bezala izan zitezkek: edozer zula dezaketek. Irakurtzen dituk eta zulatu egiten haute: hauxe duk ene ikasleei irakatsi nahiez nabilena: zorrotz eta sarkor idatz dezatela. Baina zer balio du artikulu bat sar dakian Elkarte-kanta bati buruz, edo lurrin-organoen azken aurrerapenari buruz? Gainera, posible al duk hitzak X izpiak bezain sarkorrak eta bortitzak izan daitezen, huskeria hauetaz idazten denean? Ba al daiteke ezer ezertaz esan? Kontuak kontu, hortxe diagok koska.

—Ixo! —esan zuen Bernardek—. Norbait atean dela uste diat —marmartu zuen.

Helmholtz zutitu zen, gurutzatu zuen gela oinen puntetan eta mugimendu azkar eta latzez, atea den-dena zabaldu zuen. Baina ez zegoen inor.

—Arraioa! —esan zuen Bernard-ek, barregarri geratu zela konturaturik—. Artega samar niagok. Jendeak errezeluz begiratzen dionean bati, norberak ere errezeluz begiratzen ziek denei.

Begiak igurtzi zituen, hatsartu zuen eta ahoskera tristea ageri zitzaion. Justifikatzen ari zen.

—Baheki zenbat agoantatu behar izan dudan aspaldion! —esan zuen ia negarrez. Eta haren buru-urrikiaren uholdea enbaltse bateko presa apurtu balitz bezalakoa zen—. Baheki!

Helmholtz-ek pixka bat gogoz kontra aditzen zion. «Bernard gizagaixoa!» zioen berekiko. Baina era berean lotsaturik zegoen bere lagunaren jokaeraz. Bernardek harrotasun gehitxoago agertu behar luke.

# BOSTGARREN KAPITULUA

## I

Arratseko zortziak aldean argia gutxitzen hasi zen. Stokes Poges Klubeko bozgorailuek, tenore ahots normala baino zorrotzagoz, Golf zelaiak ixteko ordua zela iragarri zuten. Leninak eta Henryk beren golfaldia utzi eta Klubera jo zuten. Barruko eta kanpoko Sekrezio Trust-eko instalazioetatik milaka behiren urrumak entzuten ziren. Animalia hauek, beren hormonaz eta esnez, Farnham Royal-eko fabrika handirako behar ziren lehengaiak ematen zituzten.

Helikopteroen etengabeko zurrungak betetzen zuen ilunabarreko airea. Bi minutu t'erdi bakoitzeko, txirrin batek eta txistu batzuek iragartzen zuten golflariak metropolira bueltan eramateko tren errailbakar arin baten irteera. Leninak eta Henryk aparailura igo eta arrankatu zuten.

Berrehun eta berrogeita hamar metroko altueran, Henryk helizearen erreboluzioak gutxitu zituen eta minutu bat edo bitan airean zintzilik egon ziren, galduz zihoan

paisaiaren gainean. Burnham Beeches-eko oihana ilungune handi bat bezala hedatzen zen, Mendebaleko ortzi bazter argitsurantz. Zerumuga gorrian, eguzki sartzearen hondarrak zurbiltzen ari ziren, laranja koloretik horira iraganez, eta azkenez berde motel ur antzekora. Iparraldean, zuhaitzez beste aldean eta zuhaitzen gainetik, Barruko eta Kanpoko Sekrezioen fabrika dizdiz zegoen, bere hogei solairuko leiho guztietatik zetorren argi elektriko bortitzaz. Haien begien azpian Golf Klubeko eraikuntzak hedatzen ziren, kasta beheragokoen kaserna handiak, eta, hesi banatzaileaz beste aldean, Alfa eta Beta kastakideentzako etxetxoak. Errailbakarraren estaziorako helbideak kasta beheragoko txinurrien artean beltz nabari ziren. Kristalezko bobedatik irtenik, tren argidun bat kanporantz abiatu zen. Zabaldi ilunean zehar Hego-Mendebalerantz zihoazela, Slough-eko Erretegiko eraikuntza galantekin topo egin zuten haien begiek. Gauez zebiltzan hegazkinen segurantzarako, lau tximinia luzeak argi-argitan ageri ziren eta gailurrean arrisku seinale gorriak. Zuzenbide ederra ziren tximiniok.

—Zertarako dituzte tximinia horiek balkoi antzeko horiek inguruan? —galdetu zuen Leninak.

—Fosforoa berreskuratzeko —azaldu zuen Henryk telegrafoz gisa—. Tximiniatik goranzkoan lau tratamendu ezberdin pasatzen dituzte gasek. Lehenago $P_2O_5$ galdu egiten zen norbait erretzen zuten bakoitzean. Orain, ordea, ehuneko larogeita hamazortzitik gora errekuperatzen da. Kilo eta erditik gora adulto gorpu bakoitzeko. Guztira ia larehun tonelada fosforo urtero, Ingalaterran bakarrik. —Henry harro mintzo zen garaipen hartaz, berea balitz bezala gozatuz—. Itzela da pentsatzea hil eta gero ere

mesedegarri izan gakizkiokeela gizarteari, landareak hazteko ongarria emanez.

Bitartean, Leninak apartatu zituen handik begiak eta orain errailbakarraren estaziora begira zegoen perpendikularki.

—Itzela da, bai —baietsi zuen—. Baina xelebrea da ere pentsatzea Alfek eta Betek ez dutela landareak hazteko, hemengo Gamma, Delta eta Epsilon nazkagarriok baino gehiagorik balio.

—Fisika-kimikaz gizaki guztiak dituzu berdinak —esan zuen Henryk esaera gisa—. Gainera Epsilonek berek ere behar-beharrezko zerbitzuak egiten dizkizute.

—Epsilonak berak ere...

Lenina kolpera oroitu zen nola behinola, artean eskola haur zela, itzarri zen gauerdian eta lehenengoz konturatu zer zen loa galerazten zion murmurio hura. Oraintxe ere entzuten zegoen emeki-emeki mintzo zen ahots hura (hitzak gogo-gogoan zituen, ahaztu gabeak, ahaztu ezinak, hainbeste gautan entzun baitzituen): «Mundu guztia ari da mundu guztiarentzat. Ezin dezakegu inortxo ere bazter. Epsilonak berak ere baliozko zaizkigu. Ez gaitezke Epsilonik gabe bizi. Mundu guztia ari da mundu guztiarentzat. Ez dezakegu inortxo ere bazter...» Leninak gogoan zuen oraindik nolako ikara eta harridura sartu zitzaizkion lehenengotan, nolako gogoetak egiten zituen loa galdurik, ordu erdian; eta nola gero, amaitu gabeko entzunaldi haiek eraginda, baretuz zihoakion gogoa eta hurbilduz loa...

—Dena dela, Epsilonei ez die nonbait, axola handirik emango Epsilon izateak.

—Ez horixe. Nola lieke axola? Haiek ez dakite besterik izatea zer den. Guri, bai, axola liguke, jakina. Baina

gu beste modu batera egokituak izan ginen. Gainera heredentzia ere diferentea daukagu,

—Pozten naiz Epsilon ez naizelako —esan zuen Leninak, arras konbentziturik bezala.

—Eta Epsilon bazina ere —esan zion Henryk—, zeure egokimenduak berak behartuko zintuzke poz berdina hartzera Beta edo Alfa ez izateaz.

Ipini zuen martxan aurreko helizea eta aparailua Londreserantz zuzendu zuen. Haien atzean, Sartalde partean, kolore gorrixka-horixkak ia zeharo hilik zeuden. Laino zerrenda ilun bat ageri zen ortzi gailurrean. Erretegiaren parean hegan zihoazela, aparailua gorantz saltatu zen kolpera, tximinietatik zetorren haize bolada beroak jaurtikita. Baina berriro jausi zen kolpera hurrengo haize bolada hotzean sartzeaz batera.

—Hauxe mendi errusiar bikaina! —hots egin zuen Leninak gustora barre eginez.

Henry, ordea, triste samar jarri zen mementu batez.

—Ba al dakizu gero mendi errusiar hau zer den? —esan zuen—. Gizaki bat duzu hori, betirako hila. Horixe zen haize bolada bero hori. Jakitekoa litzateke nor izan den hila, gizona ala emakumea, Alfa ala Epsilona... —Hatsartu zuen eta gero, golkoa bete pozez, bukatu zuen—: Nolanahi ere, gauza bat behintzat ziur dakigu: zena zela, zoriontsu izan zela bizitzan. Gaur mundu guztia da zoriontsu.

—Bai, gaur mundu guztia da zoriontsu —berresan zuen Leninak oihartzun gisa.

Hitz hauek berauek gauero entzunak zituzten ehun eta berrogeita hamar aldiz, hamabi urtetan zehar.

Berrogei solairuzko Henryren apartamentu etxeko azotean lurrartu zuten, eta jantokira zuzen. Han, lagunarte

alai eta algaratsuan, afari eder bat jan zuten. Kafeaz soma hartu zuten. Leninak gramo erdiko bi garau eta Henryk hiru. Bederatziak eta hogeian kalean barrena abiatu ziren, Westminster Abadiako kabaret inauguratu berrirantz. Gau izarreztatua zegoen, ez lainorik ez ilargirik gabe. Baina zorionez Lenina eta Henry ez ziren ohartu gertaera triste honetaz, zeren anuntzio argitsuek ez baitzuten uzten kanpoko ilunberik ikusten. *«Calvin Stopes eta bere Hamasei Sexofoilariak»*. Abadia berriko ataurrean letra izugarriak dizdiz, ondo etorrika. *«Londresko kolore eta lurrin organorik onena. Musika sintetikorik berriena.»*

Sartu ziren. Airea bero zegoen, ia sargori. Arnasa ere nekez har zitekeen, hango anbar gris eta sandalo usainaren usainez. Atariko sabai bobedatuan, kolore organoak tropikoko eguzki sartze bat pintatua zeukan pixka batez. Hamasei Sexofoilariak kanta zahar famatu bat jotzen ari ziren: *«Ez dago munduan botilarik ene botilatxo kutuna halakorik»*. Larehun bikotek *five-step* bat dantzatzen ziharduten, zelai distiratsu guriaren gainean. Lenina eta Henry ere han ziren laster dantzan. Sexofoiak behin marrauka, katu melodikoak ilargipena bezala, behin intzirika tenore doinu zorrotzez, azkenetan bezala. Hots armonikoetan aberastasun handiz, haien koru dardartia gora eta gora zihoan, gero eta gorago, gero eta gogorrago. Azkenik zuzendariak, esku eragin batez, azkenengo nota jaurtiki zuen airera, musika etereozko iskanbila galantean, eta existentziatik borratu zituen hamasei musikoak, gizaki hutsak izaki gaixoak. Trumoi bat *la bemol nagusian*. Gero hotsa eta argia motelduz zihoan; pixkanaka-pixkanaka, tonu laurenka, linburtzen zen *diminuendo* bat, jausiz, jausiz, motelki jotako akorde oinarri bateraino iritsi arte. Akorde honek luzaro irauten zuen (bitartean lautik boste-

ko erritmoak pultsuari eusten ziola azpitik). Segundu ilun haiek espektazio itzelez kargaturik zeuden. Eta azkenez, espektazio hark jo zuen bere azkena. Egunsentia egin zen kolpera, eta Hamaseiek kantuari ekin zioten denek batera:

*Ene botilatxo!, beti zintudan zu desiatu*
*Ene botilatxo! zergatik ninduten dekantatu?*
*Zure baitan zerua urdin*
*beti eguraldi atsegin.*
*Ez baitago munduan botilarik*
*ene botilatxo kutuna halakorik.*

Larogei bikote era batera, jiraka batetik bestera, Westminster-eko Abadiako pista inguruan. Lenina eta Henry, ordea, beste mundu batean zebiltzan dantzan, somaren mundu bero, koloretsu eta atsegintsuan. Zeinen maitagarri, lirain eta jostari ziren denak! Ene botilatxo, beti zintudan zu desiratu! Baina Leninak eta Henryk bazeukaten desiatzen zutena. Orduantxe bertantxe, botila barruan zeuden, salburik biak, hango eguraldi atseginaz eta zeru beti urdinaz gozatuz. Leherrak eginda ia, Hamaseiek utzi zituzten beren sexofoiak, eta Musika Sintetikozko tresna hasi zen kreaziorik berrienak jotzen, blue Malthustar geldiak. Lenina eta Henry bi enbrioi biki izan zitezkeen orduan, jiraka eta jiraka biak batera, odol artifizialezko ozeano botilatu bateko olatutzan.

—Gabon, lagun maiteak, gabon, lagun maiteak. —Bozgorailuek kortesia handiz eta musikalez ematen zituzten aginduok—. Gabon, lagun maiteak...

Beste guztiek bezala, Leninak eta Henryk ere obeditu zuten eta kanpora atera ziren. Izar urrikarriak bidaldi polita eginak zeuden zeruan zehar. Anuntzio argitsuzko horma aislatzaile hura ere gehienbat itzalirik zegoen ia. Bi

gazteek, hala ere, zoriontsu jarraitu zuten, gauaz konturatzeke.

Dantzalekua itxi baino ordu erdi aurretik hartu zuten bigarren soma dosiak horma zulakaitz bat jaso zien mundu errealaren eta haien gogoen artean. Enbasaturik, kalea zeharkatu zuten. Enbasaturik hartu zuten azentsorea eta Henryren gelara igo, hogeita zortzigarren solairuan. Baina «enbasatuta» ere, bigarren soma gramoa hartu eta guztiz ere, Leninari ez zitzaion ahaztu agindurik zeuden prekauzio antisortzekoak hartzerik. Ez zuen alferrik eman hainbeste urte hipnopedia intentsiboan; eta hamabi urtetik hamaseira, ariketa malthustarrak astean hiru bider. Arreta hauek, beraz, begien itxi-irekia bezain automatiko eta derrigorreko zitzaizkion.

—Oraintxe gogoratzen naiz —esan zuen bainu gelatik irtetean— nola Fanny Crownek nahi duen jakin ea non aurkitu zenuen lehengoan erregalatu zenidan larru berdezko kartutxontzi polit hau.

## II

Bi ostegunik behin, Bernardek bere Zerbitzu eta Elkartasun eguna zuen. Afroditeum-ean goizetik afaldu ondoren (Helmholtz bertako bazkide izendatu berria zen 2. artikuluaren arabera) agurtu zuen bere laguna eta azoteatik taxi bati deiturik, Fordson-go Kantoria Komunalera hegan egiteko esan zion gidariari. Aparailua berrehun bat metro igo eta gero Ekialderantz abiatu zen. Eta buelta ematean, han ikusi zuen Bernardek Kantoria, galanta eta ederra. Erreflektoreek argiturik, haren Carrarako marmore zuri artifizialezko hirurehun eta hogei metro haiek

elurtzazko goritasunez ari ziren dizdiz Ludgate Hill gainetik; helikopteroentzako zuen goiko zabalunearen lau kantoietan, T gorri erraldoi bana azaltzen ziren argitsu gauean eta hogeita lau tronpeta urrezkok musika sintetiko solemne bat orroz jaurtikitzen zuten.

«Madarikazioa! Berandu netorrek!», hots egin zuen bere baitan Bernardek, Big Henry, Kantoriako erlojuari begiratzean. Hala zen izan ere. Taxiarena ordaintzen zegoen bitartean Big Henry-k ordua jo zuen. «Ford!», oihukatu zuen baxu ahots izugarri batek urrezko tronpetetatik. «Ford, Ford, Ford…!» bederatzi bider. Forden Eguna eta beste Elkartasun kantak ospatzeko auditoriuma eraikuntzaren beherengo aldean zegoen. Gelatzar honen gainean, ehun solairu bakoitzean, Elkartasun Taldeen zazpi mila gelak zeuden, bi asteroko zerbitzuetarako erabiltzen zituztenak. Bernard jausi zen hogeita hamahirugarren solairura, abiatu zen azkar pasiluan barrena eta han geratu zen, dudan pixka batean, 3.210. gelako ataurrean. Gero hartu zuen erabakia, ireki zuen atea eta sartu zen.

Fordi eskerrak, ez zen bera azkena. Mahai borobil baten inguruan ipinita zeuden hamabi aulkietatik hiru hutsik zeuden. Hurreratu zen hurbilenera, ahalik kontuenez inor kontura ez zedin; eta prest bera ere beranduago zetozenei betosko iluna jartzeko.

Beregana bihurturik, ezkerraldean eserita zegoen neskatilak galdetu zion:

—Zertan jokatu duzu gaur arratsaldean? Oztopoetara ala Elektromagnetikora?

Bernardek begiratu zion (Ford! Morgana Rothschild baitzen bera), eta gorri-gorri jarririk, aitortu behar izan zuen ez zuela batera ez bestera jokatu. Morganak harriturik begiratu zion. Eta isilune latza ondoren.

Gero bizkar eman zion apropos, eta bere eskuin aldean jezarrita zegoen gizonarengana zuzendu zen. Gizon hau deportezaleago izaki.

«Hasiera aparta Elkartasun Zerbitzu baterako!», pentsatu zuen penaz Bernardek. Bere lagunekin elkartzeko ahaleginak beste behin ere alferreko izango zitzaizkiola susmatzen zuen. Aulkirik hurbilenera jo beharrean, nortzuk zeuden bertan bilduak begiratzeko astia hartu balu bederen! Fifi Bradlaugh-en eta Joanna Diesel-en erdian eseri ahal izango zatekeen. Orain, ordea, hala egin ez zuelako, noren eta Morganaren ondoan eserita egon behar. Morgana! Ford! Haiek ziren bekain beltzak! Edo hobeki esateko, hura zen bekain beltza, zeren biak bat eginak baitzituen sudurraren gainean. Ford! Eskuin aldean Klara Deterding zeukan. Klararen bekainek ez zuten, ez, bat egiten. Baina pneumatikoegia zen, noski. Fifi eta Joanna ordea, puntu-puntuan zeuden: potolatxoak, beilegiak, ez altuegiak... Eta nori eta Tom Kawaguchi kankailutzar hari suertatu behar haien erdian eseri ahal izatea!

Sarojini Engels iritsi zen azken.

—Berandu hator —esan zion zorrozki Taldeko Buruzagiak—. Gaurkoa bedi azkena.

Sarojini, barkamenak eskatu ondoren, Jim Bokanowsky eta Herber Bakunin-en artean zegokion tokian eseri zen. Taldea osoturik zegoen orain, eta elkartasun ingurua perfektua eta akats gabea zen. Gizon, emakume, gizon, txandaka zihoazen mahai inguruan eraztun itsua osatuz. Hamabi lagunak bat bihurtzeko prest, denak zain elkartzeko, nahasteko, hamabi nortasun bakunak izaki zabal berri bakarraren alde galtzeko.

Zutitu zen buruzagia, T seinalea egin zuen eta Musika Sintetikoa piztu zuen. Danborrak eta gainetiko tresnak

—erdihaize eta super-hari—, jo eta jo ari ziren, behin eta berriro, zalapartatsu jotzen zutelarik Lehenengo Elkarte Eresiaren doinu labur eta itsaskorra. Behin eta berriro, eta ez belarriek baizik diafragmek biltzen zuten doinu mailukari hura. Etengabeko armonia haien auhenak eta burrunbadak entzuleen gogoak ez ezik, erraiak ere zoraraziko zituzten, kupidaz betez. Buruzagiak beste T seinale bat egin zuen eta eseri zen. Funtzioa hasita zegoen. Soma garau sakratuak mahai erdian jarriak zeuzkaten. Maitasunaren kopa, somaz bete-betea, marrubizko izotz baten itxuran, eskurik esku pasa zuten, formula honekin: «Ene deuseztatzerako edaten dut». Gero, orkesta sintetikoaren laguntzaz, Lehenengo Elkartasun Eresia kantatu zuten:

*Ford, hamabi gaituzu. Egin gaitzazu bat bakar.*
*Ibai Sozialeko tantak bezala*
*Iguzu Elkarrekin korri dezagula*
*Zure kotxetxo distiratsua bezain azkar.*

Hamabi ahapaldi hasperentsu honela. Gero maitasunaren kopa bigarrenez pasa zuten eskurik esku. Hau zen oraingo formula: «Izakirik Handienagatik edaten dut». Denek edan zuten. Musikak baziharduen aspertzeke. Danborrak tarrapataka. Armonia haien hotsak eta danbarradak zoraraziak zituen denak, erraiak ere urturik. Bigarren Elkartasun Eresia kantatu zuten:

*Zatoz, o Adiskide Sozial, Izakirik Handiena!*
*Deusez gaitzazu hamabiok batean*
*Hil nahi dugu, zeren hiltzean*
*hasi berri baitugu bizitzarik ederrena.*

Beste hamabi ahapaldi. Ordurako hasia zegoen soma bere lanak egiten. Begiak dizdiz, masailak gori: bihozberatasun unibertsalaren barne argia aurpegietan kanpora

zerien, zorionezko eta adiskidetasunezko irribarreetan. Bernard bera ere hunkituxe aurkitzen zen. Honetan Morgana Rothschild itzuli zitzaion eta irribarre argitsu bat egin zion. Ahal guztiak egin zituen erantzuteko. Baina lehengo bekaina, bekain bakar beltz hura, ai, han zegoen oraindik. Bernardek ezin zuen burutik kendu, inola ere ezin, nahiz eta ahalegin guztiak egin. Haren emozioa, haren besteekin elkartzea ezer gutxian geratu zen. Fifiren eta Joannaren erdian eseri balitz beharbada... Maitasunaren kopari hirugarren erronda eragin zioten: «Bere Etorkundearen hurbiltasunagatik edaten dut», esan zuen Morgana Rothschildek, zeini, hain zuzen, suertatu baitzitzaion errito biribilaren hastea. Ahotsa gogor atera zitzaion pozaren pozez. Edan zuen eta Bernardi pasa zion kopa. «Bere Etorkundearen hurbiltasunagatik edaten dut», berresan zuen honek ere, benetan saiatuz Etorkundea gainean zela sentitzen. Baina bekain bakar hark senetik ateratzen zuen; Etorkundea berriz, berari zegokionetik, izugarri urrun zegoen. Edan zuen eta Klara Deterding-i pasa zion kopa. «Gaur ere pot egingo diat —esan zuen berekiko— seguru niagok.» Hala ere, ahalegin guztiak egiten jarraitu zuen irribarretsu agertzeko.

Maitasunaren kopa buelta osoa emana zen ia. Eskua jasorik, buruzagiak seinale bat egin zuen; koruak hirugarren Elkartasun Eresia hasi zuen:

*Ez al duzu sentitzen badatorrela Izakirik Handiena?*
*Poztu zaitez, eta poztean, hil zaitez!*
*Bil zakizkio danborren musikari!*
*Zeren ni zeu bainauzu eta zu neu baitzaitut.*

Ahapaldi bakoitzeko, ahotsak beroagotzen eta eroagotzen zihoazen. Etorreraren hurbiltasuna elektrindarra

bailitzan sentitzen zen airean. Presidenteak musika amatatu zuen eta, azken ahapaldiaren azken notarekin batera, erabateko isilunea egin zen… itxaro urduriaren isilunea, bizitasunez zirgit eginez eta oldarka. Buruzagiak luzatu zuen eskua eta bapatera Ahots bat mintzo zitzaien beren buruen gaineko puntu batetik. Ahots sendoa eta astuna, beste edozein giza ahots soil baino musikalago, oparoago, beroago, maitasunez, desiraz eta kupidaz bibratzenago, ahots miragarria, misteriotsua, goitarra. Geldiro-geldiro, oso geldiro, esan zuen: «O Ford, Ford, Ford», jausiz eta gutxituz zihoan eskala batean. Halako berotasun zirrara ikaragarria sentitu zuten entzule guztiek, sabel-saretik hasi eta gorputz guztian zehar. Malkoztu zitzaizkien begiak. Bihotzak eta erraiak jauzika ari zitzaizkien barruan, bizitza propioa balute bezala… «Ford», urtzen zeuden… «Ford», urtuak zeuden… Gero beste doinu batean, kolpe--kolpera, denak izuarazirik, tronpetaka hasi zen Ahotsa: «Adi ezazue!» «Adi ezazue!» Denak adi. Tarte baten ondoren, Ahotsa beheraka hasi zen, furrunda bilakatzeraino. Furrunda hura, ordea, irrintzirik zorrotzena baino sarkorragoa zen. «Izakirik Haundienaren oinak», jarraitu zuen Ahotsak. Furrunda hiltzear zegoen. «Izakirik Handienaren oinak eskaileran daude». Berriro isilaldia. Eta jendearen espektazioa, pixka batean laxotua, berriro atezatu zen, soka bat atezatu ohi den bezala; gero eta atezuago, ia krask egiteraino. Izakirik Handienaren… O, bai, entzuten zituzten haren oinkadak, poliki-poliki eskaileran behera, berengana hurbilduz pixkanaka eskailera ikuskaitzean behera! Izakirik Handienaren oinak. Honetan krask egin zuen sokak. Begiak eta besoak zabalik, Morgana Rothschildek salto egin zuen.

—Badantzut! —hots egin zuen—. Badantzut!

—Badator! —oihukatu zuen Sarojini Engelsek.

—Bai, badator, badantzut!

Fifi Bradlaugh eta Tom Kawaguchi zutitu ziren.

—O, o, o! —hots egin zuen Joannak.

—Badator! —oihukatu zuen Jim Bokanowskyk.

Zuzendaria aurrerantz makurtu zen, botoi bati sakatu zion eta, hura zen zinbaloen eta metalezko tresnen zoramena, hura zen jotzea, hura mailuketa, hura kanpaiketa, zer ez zen hura!

—O, badator! —irrintzi egin zuen Klara Deterdingek—. Ai! —Lepoa moztu ziotela zirudien.

Bernard konturatu zen bazela zer edo zer egiteko ordua. Eta zutiturik, hots egin zuen berak ere:

—Badantzut, badator!

Baina gezurra zen. Ez zuen ezertxo entzun, ez zuen sinetsi ere egiten inor etor zitekeenik. Alferrik ekingo zion musikak, alferrik zorabiatuko ziren: inortxo ere ez. Baina besoak dantzatu eta hango onenak bezala irrintzi egiten zuen berak ere; eta besteak iharrausika, lurrari ostikoka, eta arrastaka hasi zirenean, beste hainbeste egin zuen berak ere.

Korruan dantzan hasi ziren, prozesio bat eginez eta bakoitzak aurreko dantzariaren ipurdian eskuak zituela. Jiraka eta jiraka, denak aho batez oihuka, musikaren erritmoari hankekin lagunduz eta aurrekoaren ipurdian zafladak emanez. Hamabi esku pare zaplaka, bat bakarra bezala. Hamabi ipurdi pare durundaka, bat bakarra bezala. Hamabi bat bakarra bezala, hamabi bat bakarra bezala. «Badantzut, badantzut badatorrela!» Musikak erritmoa bizkortu zuen. Hankak azkarrago ostikoka, esku erritmikoak ere azkarrago zaplaka. Eta bat-batean, baju sintetiko batek trumoika iragarri zuen ondorengo elkartzea eta El-

kartasunaren azken kontsumatzea, Hamabiak-Baten Etorkundea eta Izakirik Handienaren Gizakundea. «Uhuhu-Ahaha» kantuari ekin zion, danborrek jo eta ke tarrapataka ziharduten bitartean:

*«Uhuhu-Ahaha», Ford eta jeup,*
*besarka neskatxak eta egizkizue bat*
*Mutilak ordu betean*
*bil neskatxekin bakean:*
*Uhuhu-Ahaha-k libre uzten dizue dena.*

«Uhuhu-Ahaha...» Dantzariek batu zuten errepika liturjikoa. «Uhuhu-Ahaha, Ford eta jeup, besarka neskatxak eta egizkizue bat...» Eta kantuz ari bitartean, argiak itzaltzen hasi ziren pixkanaka. Baina argiak moteldu ahala, berotzenago, gozatzenago eta gorritzenago ziren. Enbrioi Almazen bateko arginabar gorrian zeuden dantzan azkenik. «Uhuhu-Ahaha». Odol koloreko ilunbe fetozkoan dantzariek luzaz jarraitu zuten beren jiraketa, eskuz eta hankaz eramanik azkengabeko erritmo hura. Gero korrua koloka egin, hautsi zen eta zatikatu zen; eta nola desegin, hala erortzen ziren mahai eta honen aulki planetarioen inguruan —zirkulo kontzentrikoetan— zeuden besaulkietan. «Uhuhu-Ahaha...» Xamur-xamur, Ahots astunak furrundaka ziharduen. Eta arginabar gorri hartan, uso beltz izugarri bat orekan zegoela zirudien dantzarien gainean; uso emankorra, behin ahoz gora, behin ahoz behera luze etzanik zeuden dantzarien gainean.

Zutik zeuden azotean. Big Henryk hamaikak jo berri zituen. Gau barea eta epela zegoen.

—Ederra izan da, ezta? —esan zuen Fifi Bradlaughek—. Ederra benetan, ezta?

Extasi airez begiratu zion Bernardi, baina larritasun edo asaldu arrastorik gabeko extasiz, zeren asaldaturik egotea, oraindik asegabe egotea baita.

—Ez al zaizu eder iruditu? —ekin zion berriz ere, Bernardi bekoz beko begiratuz, halako goiargiz dizdiz zegioten begi haiekin.

—O, bai horixe!, zoragarri iruditu zait! —gezur galanta bota zuen Bernardek.

Begiak apartatu zituen; aurpegi transiruditu hura ikustea salaketa zitzaion batetik eta bere isolamenduaren oroipen ironiko bestetik. Funtzioaren hasieran bezain bakar eta dohakabe zekusan orain ere bere burua. Are isolatuago bere hutsaren bete ezinez, bere asetasun hilkorrez. Armoniatik aparte eta kanpo zegoen, gainetikoak Izakirik Handienaren golkoan elkartzen ziren bitartean; Morganaren besoetan ere bakarrik sentitzen zen, askoz ere bakarrago, egiaz; orduan bere bizitza osoan baino askoz ere berberago sentitzen zen erremediogabeki. Iluntasun gorrixka hartatik argi elektrikoaren klartasun arruntera agoniaren penak iraganarazten zizkion nitasun sentimendu batez irtena zen. Mugagabeki zoritxarrekoa zen, eta agian (begi dirdiratsu haiek salatzen zuten) errua berea zukeen.

—Zoragarri benetan —berresan zuen.

Baina ezin burutik aldendu Morganaren bekain hura.

# SEIGARREN KAPITULUA

## I

«Arraroa, arraroa, arraroa»: horra Leninak Bernard Marxez zuen iritzia. Hain arraroa, non hurrengo asteetan behin baino sarriago pentsatu baitzuen ea ez ote litzaiokeen hobe Mexiko Berriko oporraldi kontua utzi eta Ipar Polora joatea Benito Hoover-ekin. Okerrena zen, ordea, Leninak ia ezagun zuela Ipar Poloa. George Edzel-ekin egona zen bertan aurreko udan, eta are txarrago oraindik, oso triste topatu zuen. Zer eginik batere ez eta antzinako hotel zahar bat: ez telebistarik logeletan, ez lurrin organorik; musika sintetiko nazkagarri pixka bat eta hogeita bost pista mugikor bakarrik berrehun lagunentzat. Ez, inola ere ez, ez zuen gehiago Ipar Poloak harrapatuko. Gainera, Amerikan behin bakarrik egona zen. Eta baldintza oso txarretan. Asteburutxo bat bakarrik New Yorken eta plan merkean bera. Jean-Jacques Habibullah-rekin ala Bokanowsky Jones-ekin joan ote zen? Ez zen gogoratzen. Nolanahi ere, ez zuen honek batere inportantziarik. Sortalde-

rantz hegan egiteko plan hura, eta aste oso baterako, txit tentagarri zitzaion. Gainera hiru egun gutxienez egingo zituen Basatien Erreserba batean. Zentro guztian dozena erdi pertsona bakarrik ziren Basatien Erreserba baten barruan izanak. Psikologo Alfa-Gehiago zelako, Bernard zen berak ezagun zituen gizon gutxietarik bat, harako baimena erdiets zezakeena. Leninarentzat aukera bakarra zen hura. Baina Bernarden arrarokeria ere hain zelako bakarra, dudan zegoen neskatxa, probetxatuko zuenentz; eta Benito begikoarekin Ipar Polora joatea ere bururatu zitzaion inoiz. Benito normala zen behintzat. Bernard, ordea…

«Alkohola jarri zioten odol artifizialean». Azalpen hauxe ematen zien Fannyk haren nabarmenkeria guztiei. Henryk, ordea —zeinekin Leninak, gau batez, biak ohean zeutzala, eztabaida beroak erabili baitzituen bere maite berriari buruz—, Henryk errinozeronte batekin konparatu zuen Bernard gaixoa.

—Errinozeronte bat hezitzerik ez dago —bere estilo labur eta gogorrez—. Badituzu gizonak errinozeronteak halakotsuak; ez diote egokimenduari behar bezala erantzuten. Deabru urrikarriak! Bernard duzu horietako bat. Eskerrak bere lanbidea ondo dakien. Bestela honez gero jaurtikia zuen kalera zuzendariak. Hala ere —gaineratu zuen, Lenina kontsolatu nahiez—, batere txarrik gabea dela uste dut.

Batere txarrik gabea. Bai, baliteke. Baina bai txit kontuzkoa ere. Alde batetik, dena pribatuan egiteko mania zuen. Eta hori, praktikan, ezertxo ere ez egitea zen. Zeren, egin al zitekeen ezer pribatuan? (Oheratzeaz aparte, jakina; baina denbora guztia ohean ematerik ez dago) Hori! Zer arraio egin zitekeen? Ezer gutxi, Lehenengoz bate-

ra atera ziren arratsaldean eguraldi ederra egiten zuen. Torquay Basa Klubean bainu bat hartzea proposatu zuen Leninak, eta gero Oxford Batzokian afaltzea. Baina han jende gehiegi zegoela esan zuen Bernardek. Eta Golf Elektromagnetikoan partidu bat Saint Andrews-en? Berriro ere ezetz. Golf Elektromagnetikoa denbora galtzea zela uste zuen Bernardek.

—Zertarako dugu, orduan, denbora? —galdetu zuen Leninak harriturik.

Lakuen inguruan paseatzeko edo, antza; hauxe baitzen Bernardek proposatu zuena. Skiddaw-ko gailurrean lurrartu eta larrerik larre paseatu ordu pare batean

—Zeurekin bakarrik, Lenina.

—Baina, Bernard, gau osoan egongo baikara biok bakarrik.

Bernard gorri-gorri jarri zen eta begiak apartatu zizkion.

—Bakarrean hitz egiteko, esan nahi dut —esan zuen ahapeka.

—Hitz egin? Zertaz, baina?

Ibili eta hitz egin! Arratsalde bat pasatzeko modu xelebrea, alajaina!

Azkenerako konbentzitu zuen Leninak, oso gogoaz kontra noski; eta Amsterdam-era hegatu ziren, pisu astunetako Burruka Txapelketa Femeninoko finaleko laurdenak ikustera.

—Jendez josia egongo da —marmartu zuen Bernardek—. Beti bezala.

Bekosko ilunez eman zuen arratsalde guztia. Ez zuen hitz egin ere nahi izan Leninaren lagunekin (atseden tarteetan dozenaka zeudenak soma izozkien tabernan). Eta bere umore txar eta guzti ere, ez zegoen hari harrerazterik

Leninak behin eta berriro eskaintzen zion gramo erdi marrubizko izozkia.

—Nahiago dut neu nerau izatea —esan zuen Bernardek—. Neu nerau eta dohakabe, eta ez beste nornahi eta alai.

—Gramo bat garaiz hartuak berriro pozarazten du —esan zuen Leninak, bere jakintza hipnopedikoa erakutsirik.

Bernardek larritasunez apartatu zuen eskaintzen zion kopa.

—Tira, ez zaitez zeure onetik atera —esan zuen Leninak—. Gogora zaitez zentimetro kubiko bakar batek hamar tristura sendatzen dizkizula.

—Isil zaitez behingoz, Forden amodioarren! —hots egin zuen Bernardek.

Bizkarrak jaso zituen Leninak.

—Hobe duzu beti ere gramo bat, dioskada bat baino, —bukatu zuen duintasunez. Eta bere izozkia hartu zuen.

Bueltan, kanalaren parean zetozela, helize bultzaria geldiarazi eta itsaso gainean zintzilik egotea pentsatu zuen Bernardek, olatuetatik hogeita hamar bat metrotara. Eguraldia zakartuta zegoen. Hegohaizea atera zuen eta zerua lainotsu ageri zen.

—Begira —agindu zion Bernardek.

—Beldurgarri deritzot —esan zuen Leninak leihoskatik apartaturik. Ikara sartu zioten gaueko hutsune iheskor hark eta oinpean zuten itsasoko olatutzar beltz apartsuek eta ilargiaren aurpegi zurbil, zimel, tristeak, laino artetik iheska—. Jar dezagun irratia berehala.

Leninak luzatu zuen eskua, sakatu zion aparatuaren taulako botoiari eta zetorrena zetorrela konektatu zuen.

—...zure baitan zerua urdin —abesten zuten Hamasei ahots dardartik—, beti eguraldi atsegin...

Gero zotin bat, eta isilik. Bernardek itzali egin zuen.

—Itsasoa bakez ikusi nahi dinat —esan zuen—. Zarata zakar honekin ez zegon begira egoterik ere.

—Baina polita baita! Nik ez dut begiratu nahi.

—Nik bai, ordea! —ekin zion Bernardek— Sentiarazten dit halako zer bat, zera... —dudan zegoen, hitz egokiak aurkitu nahiz—. Nolabait nerauago naizela, konprenitzen? Neu nerauago, bai, eta ez beste zer baten zati. Ez gorputz sozialeko zelula bat bakarrik. Zuk ez al duzu horrelakorik sentitzen, Lenina?

Baina Lenina negarrez ari zen.

—Ikaragarria, ikaragarria —zioen behin eta berriro—. Nola mintza zaitezke horrela? Nola esan dezakezu ez duzula nahi gorputz sozialeko zati izan? Nolanahi ere, mundu guztia ari da mundu guztiarentzat. Ez dezakegu inortxo ere bazter. Epsilonak berak ere...

—Bai, bazekinat —esan zuen Bernardek burlaz— «Epsilonak berak ere baliozko zaizkigu». Eta neu ere bai. Hobe ez banintz!

Lenina eskandalizaturik geratu zen biraotzar haietaz.

—Bernard —protestatu zuen minez eta harriduraz—. Nola dezakezu horrelakorik esan?

—Nola dezakedan? —berresan zuen pentsakor Bernardek beste aire batez—. Ez, egiazko kakoa beste zer honetan dago: «Ea zergatik ez dezakedan esan?» Edo, are hobeki, zeren jakin ondo baitakit, zer sentituko nukeen libre izaterik banu, libre banintz, neure egokimenduaren esklabu ez banengo?

—Baina, Bernard, zuk esaten dituzu esatekoak.

—Zuk ez al duzu, bada, libre izan nahi, Lenina?

—Ez dakit zer diozun. Ni libre naiz. Libre neuk nahi adina dibertitzeko. Gaur mundu guztia da zoriontsu.

Bernardek barre egin zuen.

—Jakina, «gaur mundu guztia da zoriontsu». Horixe da bost urteko haurrei esaten dieguna. Baina ez al litzaizuke gustatuko, zera... beste nolabait zoriontsu izateko askatasuna edukitzea? Zeure gisa, esate baterako; ez beste guztien gisa.

—Ez dut konprenitzen zer diostazun —esan zuen berriro Leninak. Gero, Bernardengana bihurturik, erregutu zion—: O, goazen hemendik, Bernard! Ez zait hau guztia batere gustatzen.

—Ez al zaizu, beraz, nirekin egotea gustatzen?

—Jakina baietz. Baina toki hau beldurgarria da.

—Nik uste nuen hemen... hurbilago egongo ginela, itsasoa eta ilargia bakarrik genituela lagun. Jendartean eta neure gelan bertan ere baino elkarrekinago. Ez al duzu konprenitzen?

—Ez dut tutik konprenitzen —esan zuen Leninak ausarki, bere konpreniezinari gogor eutsi nahiz—. Tutik ere ez. —Eta beste aire batez jarraitu zuen—: Eta gutxiago konprenitzen dut zergatik ez duzun soma hartzen ideia modu horiek bururatzen zaizkizunean. Eta zorigabe sentitu beharrean, zoriontsu zinateke. Txit zoriontsu —esan zuen berriro.

Eta begietan larritasun nahasia ageri zitzaiolarik ere, irribarre egin zion, batera maltzur eta haragikoi agertu nahiz.

Bernardek isilik, astunki begiratu zion gonbidapen inplizito hari erantzun gabe. Segundu gutxitara Leninak apartatu zituen begiak, irritxo larri bat egin zuen, nahi

zuen zerbait esateko aurkitu, baina ez zuen aurkitu. Isilunea luzatu zen.

Azkenez, noizbait, Bernardek hitz egin zuen ahots ahulez eta nekatuz.

—Konforme —esan zuen—; goazen.

Eta azeleradorea bortxaz zapaldurik, tximistan jaurtiki zuen aparatua, gora eta gora, eta mila eta berrehun metroko altuerara iristean, helize bultzaria martxan jarri zuen. Isilik hegan egin zuten bat edo bi minutuan. Gero, bat-batean barreari eman zion Bernardek. Era estrainioz, Leninaren ustez. Baina, zena zela ere, ezin uka barre karkara galanta jaurtiki zuela.

—Hobeto al zaude? —ausartu zen galdetzen.

Erantzun ordez, Bernardek erritiratu zuen eskua mandoetatik, eta beso batez inguratzen zuela, bularrak igurtzitzen hasi zitzaion.

«Fordi eskerrak —esan zuen Leninak berekiko— zentzutu dun».

Geroztik ordu erdira, Bernarden gelan zeuden bueltan. Honek lau soma garau irentsi zituen kolpera, irratia eta telebista martxan jarri zituen, eta biluzten hasi zen.

—Beno —esan zuen Leninak aproposeko pikardiaz biharamun arratsaldean, berriro azotean elkar aurkitzean—. Dibertitu al zinen atzo?

Bernardek baietz buruaz. Igo ziren abioira. Iharrosalditxo bat, eta gora.

—Oso pneumatikoa naizela diote denek —esan zuen Leninak pentsakor, izterretan kolpetxo batzuk emanez.

—Oso eta oso, bai.

Baina Bernarden begiek minbera zela ematen zuten. «Haragi puska bat bezala», pentsatzen zuen.

Leninak urdurituxe begiratu zion.

—Baina ez nauzu «potoloegitxo» aurkituko, ezta?

Bernardek ezetz buruaz. «Haragi puska bat bezal-bezalaxe».

—Puntuan aurkitzen al nauzu?

Beste baiezko mutu bat Bernardek.

—Alde guztietatik?

—Bai, egin-egina zaude —esan zuen Bernardek ozenki. Eta bere golkorako: «Horra zer iritzi duen bere buruaz. Bost axola zaiok haragi puska bat izatea.»

Leninak irribarre egin zuen garaile. Baina haren pozak ez zuen askorik iraungo.

—Hala ere —jarraitu zuen Bernardek, isilune labur baten ondoren—, nahiago nukeen beste modu batera bukatu balitz guztia.

—Beste modu batera? Buka al zitekeen beste modu batera?

—Nik ez nuen nahi ohean buka genezan —argitu zuen Bernardek.

Lenina harriturik geratu zen.

—Nahi dut esan, ez hain kolpera, ez lehenengo egunean.

—Baina, orduan, zer…?

Bernard tontakeriak barra-barra jaurtikitzen hasi zen, zein baino zein konprenigaitzagoak eta arriskutsuagoak. Leninak ahal guztiak egin zituen bere gogameneko belarriak ixten. Baina ezin galerazi noizik noizera zer bat edo beste entzuterik: «…nork bere grinei eusteak zer ondorio dakarren frogatzeko», entzun zion esaten.

Bazirudien hitz hauek bere gogameneko erresorteren bati jo ziotela.

—«Ez utzi biharko gaur eduki dezakezun dibertsiorik» —esan zuen Leninak astunki.

—Berrehun berresaldi, astean bi bider, hamalau urtetik hamasei t'erdira —esan zuen soilki Bernardek. Eta aurrera zerraion bere berriketa eroari.

—Grina zer den jakin nahi dut —entzun zuen Leninak haren ezpainetatik—. Zerbait bortxaz sentitu nahi dut.

—«Indibiduoa minbera, Elkartea gainbehera.»

—Beno: eta zergatik ez da pixka bat gainbeheratuko?

—Bernard!

Bernardek ez zuen lotsa handirik erakusten.

—Adultoak intelektualki eta lanorduetan —jarraitu zuen— eta haur hutsak sentimenduei eta desioei dagokienez.

—Gure Fordek maite zituen haurrak.

Bernardek, ez-entzun eginik, jarraitu zuen:

—Lehengo egunean, kolpe-kolpean, buruak eman zidan posible dela adulto izatea mementu guztietan.

—Konprenitzen dut.

Leninak ahoskera irmoa zuen.

—Badakit, bai. Eta horrexegatik oheratu ginen elkarrekin atzo, haurrak bezala, adultoak bezala jokatu eta itxaron beharrean.

—Baina dibertigarria izan zen —ekin zion Leninak— Ez al da egia?

—O!, jakina, oso dibertigarria! —erantzun zuen Bernardek. Baina haren mintzoera hain zen minbera, hain zen garratza, Leninak kolpera sentitu zuen bere garaipen guztiak pikutara zihoazela. Beharbada, besteak beste, gizenegi topatzen zuen Bernardek.

—Esana ninan nik —erantzun zion soilki Fannyk, honen berri jakitean—. Odol artifizialean jarri zioten alkohola dun hori.

—Hala ere —ekin zion Leninak—, gustatzen zaidan. Esku bitxiak dizkin. Eta bai dotore mugitzen dituela bizkarrak. —Hasperen egin zuen—. Baina nahiago niken hain arraroa ez balitz.

## II

Bernard zuzendariaren despatxuko ate aurrean geratu zen pixka batez; arnasa hartu zuen eta koadratu zen, barruan aurkituko zituen betosko eta gaitzespenei aurpegia emateko prestatuz. Gero hots egin zuen eta sartu zen

—Baimen baterako zeure firma eskatzera natorkizu, zuzendari jauna —esan zuen ahalik eta naturalen.

Eta mahai gainean utzi zuen papera. Zuzendariak begirada garratza jaurtiki zion. Baina agiri buruan Inspektore Mundialaren Bulegoko zigilua ageri zen, eta azpian Mustafa Monden firma gihar eta lodia. Beraz, dena zegoen zuzen. Zuzendariak ez zeukan ukatzerik. Idatzi zituen bere inizialak —bi letra triste Mustafa Monden firma azpian—, eta gehiagoko gabe, bihurtzera zihoakion papera Bernardi. Honetan, kasualitatez, haren begiek baimeneko testuan idatzita zetorren zerbaitetan erreparatu zuten.

—Mexiko Berriko Erreserba batera hoala? —esan zuen. Haren ahoskerak eta Bernardi begiratzeko erak garbi erakusten zuten harri eta larri geratu zela.

Bere zuzendariaren harriduraz harriturik, Bernardek baietz esan zuen. Isilaldi bat gero.

Zuzendaria eseri zen patxadan bere aulkian, kopeta zimurturik.

—Zenbat urte ote da? —esan zion areago bere buruari, Bernardi baino—. Hogei urte, nonbait. Ia hogeita bost.

Heure edadea gutxi gorabehera. —Arnasa hartu eta buruari eragin zion.

Bernard gibelak jaten zegoen. Zuzendaria zen gizon konbentzionalaz, zen korrektuaren korrektuaz, nola eror zitekeen halako inkongruentzian! Aurpegia estali eta korrika ihes egiteko gogoak eman zion. Ez ezer txarrik aurkitzen ziolako jendeak antzinako kontuez hitz egiteari; zeren hainbeste aurriritzi hipnopedikoetarik bat baitzen hori, berak (bere ustez, bederen) ia zeharo kenduta zeukana. Beste zerak erretzen zizkion gibelak, alegia, zuzendariak gaitzetsi egiten zuela; eta hala ere, gaitzespen eta guzti ere, debekaturik zegoena egiteraino iritsi zela. Zer barne indarrek eragin ote zion? Desgogara egonik ere, Bernard adi-adi zegokion.

—Heuk bezalakoxe ideia eduki nian —esan zuen zuzendariak—. Basatiak ikusi nahi nizkian. Mexiko Berrirako baimena lortu eta hara joan ninduan udako oporrak pasatzera, garai hartan nerabilen neskatxarekin. Beta-Gutxiago bat zen, eta uste diat —begiak itxi zituen— uste diat errubia zela. Nolanahi ere, pneumatikoa huan behintzat, oso pneumatikoa; honetaz ondo gogoratzen nauk. Beno, joan gintuan hara, basatiak ikusi genizkian, zaldi gainean ibili gintuan, etabar, etabar. Eta gero, ia azkenengo egunean... gero... beno, neskatxa galdu egin zitzaidaan. Mendi nazkagarri haietako batera joan gintuan zaldiz. Bero izugarria eta itogarria egiten zian. Bazkaldu ondoren siestara joan gintuan. Nik behintzat lo egin nian. Itzartzean, ordea, neskatxarik ez han. Mementu hartan ekaitz handi bat atera zian gure gainean, bizitza guztian ezagutu dudanik gogorrena. Hura huan euriaren euria, hura trumoi hotsa, hura tximistaldia! Zaldiak askatu eta ihesari eman zitzaizkioan lauroinka. Harrapatu nahi nituela, erori nin-

duan eta belauna zauritu. Ia ibiltzerik ere ez neukan. Hala ere neskatxaren bila hasi ninduan, deiadarka eta deiadarka deituz. Arrastorik ere ez. Gero pentsatu nian ostatura joko zuela. Abiatu ninduan, beraz, haranean zehar arrastaka, ekarri genuen bidea eramanez. Belaunak min itzela ematen zidaan eta soma errazioak galduak nizkian. Orduetan ibili beharra izan nian. Gauerdira arte ez ninduan ostaturaino iritsi. Eta neskatxa ez zegoan han; ez zegoan —berresan zuen zuzendariak. Isilaldia gero—. Hala gauzak —jarraitu zuen azkenez— biharamunean bilaketa antolatu genian. Baina ez genian aurkitu. Amildegiren batetik behera erori bide huan, edo akaso mendietako lehoiren batek irentsia. Fordek zekik. Ikaragarria izan huan hura. Jota geratu ninduan. Behar baino gehiago, aitortzen diat. Zeren, okerrenean ere, akzidente ura edozeini gerta bailekiokek. Eta, inolaz ere, gorputz sozialak berdin zirauk, bere zelulak aldatu arren. —Baina kontsolamendu hipnopediko hura ez zen efikazegia.

Eta zuzendaria isilik geratu zen bere oroitzapenetan.

—Kolpe izugarria izan behar zuretzat nahi eta ez —esan zion Bernardek ia inbidiaz.

Bernarden ahotsa entzutean, ikara sartu zitzaion zuzendariari, errudun sentitu eta non zegoen konturatu zen. Begirada bat jarutiki zion Bernardi, eta begiak apartaturik, gorri-gorri jarri zen kolpera; bat-bateko mesfidantzaz begiratu zion berriro ere, bere duintasunean zauritua.

—Baina ez pentsa —esan zuen— inolako lizunkeriarik erabili genuenik neskatxa hark eta biok. Bihozkadarik batere ez, zer luzeegirik bat ere ez. Dena izan huan guztiz sanoa eta normala. —Baimena luzatu zion Bernardi—. Ez zekiat zergatik asperrarazi haudan huskeria hauekin. —Bere buruaz amorraturik sekretu hain lotsagarria agertu

ziolako, Bernardengan deskargatu zuen bere amorrazio guztia. Oraingoan begikera zitala zuen oso—. Aukera hau aprobetxatuz, Mr. Marx —jarraitu zuen—, esan beharra diat ez nagoela batere konforme hire ordu libreetako portaeraz datozkidan informeekin. Hori ez dela nire kontua esango didak beharbada. Baina baduk. Zentro honetako izen onaz kargutu beharra diat. Nire lagileek ez diate susmabiderik txikiena ere eman behar, batez ere kasta goikoek. Alfak egokiturik dauden modura, ez zeudek derrigorrez derrigortuta beren emozioetan haurren gisa jokatzera. Are behartuago zeudek, beraz, aparteko ahaleginak egitera hartaratzeko. Haien egitekoa haur izatea duk, nor bere joeren kontra bada ere. Honegatik, Mr. Marx, jakinean ipintzen haut. —Zuzendaria zorrotz eta inpertsonal jarri zen. Ahotsak dardar egiten zion haserrearen haserrez; horra haurren normak hautsi zituelako gaitzespen espresiorik argiena—. Hire portaeraz kexurik gehiago heltzen bazait aurrerantzean, Subzentro batera eraman hazatela eskatuko diat. Islandiara ahal bada. Egunon.

«Honekin bapo ikasiko dik», esan zion bere buruari. Baina oker zegoen. Zeren Bernard oilartuago atera baitzen despatxutik, atea danba itxirik, poz eztitan bakar-bakarrik aurkitzen zela pentsatuz, gauzen ordenuaren kontrako burruka heroikoari emana; bere sentidu eta inportantzia indibidualaren kontzientzia mozkorgarriz animatua. Zigor amenazuak ere ez zuen kikiltzen; aitzitik, ikuilu zitzaion hori. Bazuela sentitzen zuen zigorrari eusteko eta jasateko indarrik aski, bai eta Islandiari aurrea emateko ere. Konfidantza are handiagoa zuen oraindik, zeren, egiaz, txit sinetsia baitzegoen, ez zuela halako ezeri aurrea eman beharrik izango. Inor ez dute halako gauzengatik trasladatzen. Islandia amenazu hutsa zen. Pasi-

luan barrena zihoala, ezin eutsi Bernardek kanta bat txistukatzeko gogoari.

Gauez, Watsonekiko entrebistan, zuzendariarekin izandako berriketaldiaren kontaketak heroi trazak zituen.

—Eta azkenean —bukatu zuen— Amaigabeko Lehenera joan zedila esan eta hanka egin nioan despatxutik. Horra hor guztia.

Espektazioz begiratu zion Helmholtz Watsoni, honen onespen edo txundiduraren zain. Baina Helmholtzek ez zuen hitzik atera, eta eserita zegoen begiak lurrera zituela.

Maite zuen Bernard; asko estimatzen zion bera izatea inportantetzat zituen gauzez mintza zekiokeen ezagun bakarra. Hala ere, bazuen Bernardek alderdi okerrik. Esaterako, panparreria hura. Eta bestetik autourriki aldi haiek aldizka. Eta ohitura negargarri hura, gertatuak gertatuz gero ausart agertzeko eta animuz beterik... inor bistan ez denean. Higuingarri zitzaizkion guzti hauek, Bernard maite zuelako hain zuzen ere. Segunduak bazihoazen. Helmholtzek lurrera begira zirauen. Eta honetan, kolpe-kolpera, Bernard lotsa-lotsa egin zen eta apartatu egin zion begirada.

## III

Bidaian ez zuten gorabehera txikienik izan. Pazifiko-ko Kohete Urdina bi minutu t'erdi lehenago iritsi zen Orleans Berrira, lau minutu galarazi zizkion haize zirimola batek Texasen; baina 95 grado luze Sartaldera iristean, haizea alde harrapatu zuen eta Santa Fen lurrartu zuen izendatu ordua baino berrogei segundu beranduago.

—Berrogei segundu sei ordu t'erdiko hegaldian. Ez dago gaizki —aitortu zuen Leninak.

Gau hura Santa Fen pasa zuten. Hotela ezin hobea zen, mila bider hobea, esaterako, Egunsenti Iparreko palazio nardagarri hura baino, zeinetan Leninak hainbeste sufritu baitzuen aurreko udan. Gela guztiek zeukaten aire likido, telebista, irrati, bibraziozko masaia, kafeina-ur irakin eta zortzi lurrin klase diferente. Atarian sartu zirenean, musika sintetikoko tresna jo eta ke ari zen eta bapo jo ere.

Azentsoreko idaztxartelak informatzen zuenez, hotelak hirurogei pilotaleku mugikor zituen eta parkean Oztopo Golfera eta Elektromagnetikora joka zitekeen.

—Itzela da benetan hau! —hots egin zuen Leninak—. Ia berton geratzeko gogoa ematen dit. Hirurogei pilotaleku!...

—Erreserban batto ere ez duzu izango bada —ohartarazi zuen Bernardek—. Ez lurrinik, ez telebistarik, ez eta ur berorik ere. Ezingo diozula eutsi uste baduzu, zaude berton ni itzuli arte.

Lenina haserretu egin zen.

—Jakina eutsi dezakedala. Hau itzela dela esan dut nik, zeren... beno, zeren aurrerapena itzela baita. Ez al da egia?

—Bostehun berresaldi astean behin, hamahiru urtetik hamaseira —esan zuen asperturik Bernardek, bere buruarentzat bezala.

—Zer diozu?

—Aurrerapena itzela dela diot. Honegatik ez duzu nirekin Erreserbara etorri behar, bene-benetan nahi ez baduzu behintzat.

—Nahi dut, bada.

—Konforme orduan —esan zuen Bernardek ia amenazuka.

Baimenerako Erreserbazainaren firma behar zuten, eta despatxura joan zitzaizkion biharamun goizean. Atezain beltz Epsilon-Gutxiago batek pasa zuen Bernarden txartela, eta berak ere ia berehalaxe pasarazi zituen.

Erreserbazaina Alfa-Gutxiagoa zen, beilegi, buru borobil, zaparrote, koloretsu, aurpegi potolo eta bizkar zabala. Ahots gogorra eta zorrotza zuen, zientzia hipnopedikoa enuntziatzeko aproposekoa. Hamaika kontu alferreko eta inork eskatu gabeko kontseilu ematen zekien hitzontzia. Behin hasiz gero, ez zuen azkenik, bere trumoi ahots burrunbariz.

—...bostehun eta hirurogei mila kilometro koadratu, lau Suberreserbaren artean, bakoitza tentsio altuko kable hesi batez inguratua.

Hartan, inolako arrazoirik gabe, kolpera gogoratu zitzaion Bernardi bere bainugelako Kolonia-ur txorrota zabalik utzi zuela, Londresen...

—...Kainoi Nagusiko Hidroelektrikatik zetorren indarrez elikatua...

«Ez zaidak dirutza makala kosta behar hara itzul nadinean». Irudimenez bazekusan Bernardek nola bere lurrin kontagailua jiraka eta jiraka ari zen aspertzeke. «Berehalaxe telefonatu behar zioat Helmholtz Watsoni».

—...bost milatik gora kilometro hesi, hirurogei mila voltiora.

—Hara —esan zuen Leninak kortesiaz. Ez zuen tutik ere konprenitzen Erreserbazainak zioenik, baina haren atseden teatrala probetxatu zuen zerbait esateko.

Erreserbazainak bere hitz jarioari ekin zionean, Leninak gramo erdi soma hartu zuen disimuloz; eta hari eske-

rrak lasai eserita zegoen, Erreserbazainaren aurpegira so eta so, ia extasizko arretaz, baina ezer ere entzun eta pentsatu gabe.

—Hesia ikutzea eta ber-bertan hiltzea bat dira —zioen Erreserbazainak handiro—. Ez dago inola ere Basatien Erreserbatik ihes egiterik.

«Ihes» hitz hura sugestiboa zen.

—Eta bertara bagindoaz, zer? —jaurtiki zuen zutitzekoa eginez.

Kontagailuaren eskutxoak jira eta jira ziharduen intsektu gisa, denbora zurrupatuz, bere diruak zurrupatuz.

—Ez dago ihes egiterik —berresan zuen Erreserbazainak, berriro esertzeko adierazirik. Eta baimena oraindik firmatzeko baitzegoen, Bernardek ez zuen obeditzea beste erremediorik—. Erreserban jaioak... zeren pentsa, ene andereño maite —gaineratu zuen Leninari lotsagabeki begiratuz eta marmario lizunez—, pentsa Erreserban haurrak jaio egiten direla oraindik, jaio, bai, jaio, diotsuedan bezalaxe, nahiz eta guri higuina eman honek.

Itsuskeria hau aipatzean, Leninaren koloreak gorrituko zitzaizkiola uste zuen; baina honek, somaren indarrez, irribarre egin zuen zuhurki, esanez:

—Hara!

Desengainaturik, Erreserbazainak berriro ekin zion bere berriketari.

—Erreserban jaioak, diot, bertan hiltzera destinaturik daude.

Hiltzera destinaturik... Dezilitro bat kolonia-ur minutuko. Sei litro orduko.

—Beharbada —mintzo zen berriro Bernard— beharbada hobe litzaiguke...

Aurrerantz makurturik, Erreserbazaina mahaian tarrapataka hasi zen eri luzeaz.

—Erreserban zenbat jende bizi den galdetzen badidazue, ez dakigula esango dizuet. Gutxi gorabehera bakarrik dakigu.

—Hara!

—Benetan diotsut, ene andereño maite.

Sei bider hogeita lau... ez; sei bider hogeita hamasei ia.

Bernard zurbil eta dardar zegoen egon ezinez. Baina hizmizti hura ari eta ari etengabe.

—...Hirurogei milaren bat indio eta mestizo... basati-basatiak... Gure Inspektoreek noizik noizera bisitatzen dituzte... Horretaz aparte inolako harremanik ere ez mundu zibilizatuarekin... beren ohitura eta usadio nazkagarrietan diraute oraindik... ezkontza —jakingo al duzue zer den hori—... familiak, inolako egokimendurik ez... aztikeria higuingarriak... kristautasuna, totemismoak, arbasoen adoratzea... hizkuntza hilak, hala zuñiera, espainiera eta atabaskera... pumak, urdelatzak eta beste anitz piztia... eritasun kutsakorrak... apaizak... musker pozoitsuak...

—Hara!

Aldegin zioten halakoren batean. Bernard telefonora abiatu zen korrika. Agudo, agudo; baina hiru minutu kosta zitzaion Helmholtz Watson topatzea.

—Ordu honetan basatien artean egon behar genuke —esan zuen erostaz—. Hau duk ganora modua!

—Har ezazu gramo bat —gogorarazi zion Leninak.

Bernardek ezetz. Nahiago zuen bere amorrazioa. Eta azkenez, Fordi eskerrak, lortu zuen; han zegoen, bai, Helmholtz. Azaldu zion zer gertatzen zen, eta Helmhol-

tzek berehalaxe joango eta txorrota itxiko zuela agindu zion. Berehalaxe, bai; baina bide batez aukera huraxe aprobetxatu zuen, I.E.Z.ak bezpera gauez publikoan esan zuena jakinarazteko.

—Zer? Nire ordezko baten bila dabilela? —Bernard estu eta larri zegoen—. Egina dagoela, beraz? Islandiarik aipatu al zuen? Bai? Ene Ford! Islandia! Eskegi zuen aurikularra eta Leninarengana itzuli zen. Aurpegikera txit zurbila zuen eta jota zegoen.

—Zer gertatzen zaizu? —galdertu zion neskatxak.

—Zer gertatzen? —Bernardek bere gorputza bertan behera utzi zuen aulki batean—. Islandiara bidaliko nautela.

Lehenago maiz galdetzen zion bere buruari, somarik ez beste inolako barne-errekurtsorik gabe, zer ondorio ekar ote ziezaiokeen prozedura handiren, zigorren edo pertsekuzioren bat jasan beharrak; eta sufrimendua desiratzeraino iritsi zen. Ez zen oraindik astebete, zuzendariaren despatxuan, bere burua ikusten zuela sufrimenduari ausarki eusten, areago, estoiko gisa onartzen inolako kexurik gabe. Egia esateko, zuzendariaren amenazuek bero-bero jarri zuten, handi eta inportante sentiarazi zuten. Baina —orain konturatzen zen ondo—, inoiz benetan hartu ez zituelako zen hori. Inoiz ere ez zuen sinetsiko egiazko orduan, I.E.Z.k erabakirik hartuko zuenik. Baina orain, agi zenez, amenazu haiek kunplitu egingo ziren. Bernard ikaraturik zegoen. Bere ametsezko estoizismoa eta bere teoria hutsezko ausardia erabat desagertuak ziren.

Bere buruaren kontra zegoen haserre —bai lerdoa izana zela!— zuzendariaren kontra —bai bidegabekeria egin ziola beste okasio bat ez ematean!; noski, okasio horri on-

gi jakingo zukeen lotzen—. Eta nora eta Islandiara, Islandiara...

Leninak buruari eragin zion.

«Utzi bertan behera izana eta izatekoa —aipatu zuen—. Har ezazu gramo bat eta denari bakarrik begira.»

Azkenerako konbentzitu zuen lau soma garau hartzeko. Bostgarren minutura, abolituak ziren sustrai eta fruitu; oraineko lorea bakarrik zegoen zabalik, mardulik. Atezainaren errekadu bat hartu zuten nola, Erreserbazainaren aginduei jarraituz, Erreserbako jagole bat abioian etorri zen eta azotean zain zegokien. Gammen uniforme berdedun batek agurtu zituen eta goizeko programa jakinarazi zien. Zortzi-hamar herri printzipalenei begiratu arin bat, eta gero Malpaiseko haranean lurrartu eta gosaldu. Ostatua egokia zen, eta basatiek beren udako jaialdia ospatuko zuten seguru asko herrian. Gaua pasatzeko lekurik aproposena.

Hartu zituzten abioiko eserlekuak eta gora. Hamar minutu geroago, zibilizaziotik basati aldera bitarteko mugaren parean zihoazen. Mendietan gora eta behera, gatzezko eta hareazko deserturik desertu, oihanetan eta kainoien leize ubeletan barrena, amildegi, gailur eta tontor laueko harkaitzetan zehar, hesi hura aurrera eta aurrera zihoan zuzenetara: giza gogo garailearen irudi geometrikoa. Eta hesi barrenean, han-hemenka, hezur zurizko mosaikoak edo oraindik usteltzeko haragitzar ilunak lur beltzaren gainean. Hantxe ikusi zuten azkena zenbait oreinek eta zezenek, zenbait pumak, urdelatzek eta koiotek. Sai handi jatun bat baino gehiago, haragitzarren usainera, gehiegi hurreratu nonbait kable hondagarri haietara eta halako justizia poetiko batek jo eta garbi utzi zituen.

—Ez dute inoiz eskarmentatzen —esan zuen uniforme berdedun pilotuak, beren azpian, lur gainean zeuden hezur haiek seinalaturik—. Eskarmentatuko ere ez —gaineratu zuen barrezka, animalia elektrokutatu bakoitzetik hainbesteko bat balu bezala.

Bernardek ere barre egin zuen. Bi soma gramoei eskerrak, honegatik edo hargatik barregarri iruditu zitzaion txistea. Barre eginez gero, ia berehalaxe, loak hartu zuen. Eta lotan pasa zituen Taos eta Tesuco; Namba, Picorres eta Pojoaque, Sia eta Cochiti, Laguna, Acoma eta Mesa Encantada, Cibola eta Ojo Caliente. Itzarri zenerako, Lenina maletak eramaten ari zen etxetxo koadratu batera, eta mestizo Gamma berdea indio gazte batekin hizketan zegoen, erdara ulertezin batez.

—Malpais —iragarri zuen pilotuak, Bernard jausi zenean—. Horra ostatua. Eta arratsaldean dantza izango da herrian. Gizon honexek lagunduko zaituzte —itxura zakarreko indio gaztea seinalaturik—. Dibertituko zaretelakoan nago —irribarre egin zuen—. Egiten duten guztia da xelebrea. —Hitz hauek esanik, igo zen berriro aparailura eta motorrak martxan jarri zituen—. Bihar itzuliko natzaizue. Eta gogoan izan —gaineratu zuen, lasaitarazi nahiez, Leninari begiraturik—, gogoan izan mantsoak direla; basatiek ez dizuete inolako txarrik egingo. Ondoegi dakite gasezko bonben berri, txantxetan ibiltzerik ez daukatela sinesteko.

Barrezka oraindik, helikopteroko helizea martxan jarri, azeleratu eta joan egin zen.

# ZAZPIGARREN KAPITULUA

Goiko lautada hark ontzi bat zirudien, lehoiaren koloreko hautsadar batean aterpetua. Bitartea zuzen-okerka zihoan malda malkar bien artean. Harresi batetik bestera zerrenda berde bat zetorren haranean behera: erreka eta erreka inguruak. Harrizko ontzi haren brankan —bitartearen erdi-erdian eta beraren zati bezala—, han zegoen Malpaiseko herria, haitz biluziaren gangar geometrikoa bezala. Blokea blokearen gain, pisu bakoitza hurren azpikoa baino txikiago, etxe luzeek piramide mailatuen antza ematen zuten, zeru urdinean trunkatuak. Barrenean etxetxo pila, elkarren gainean, eta horma multzoa. Lautadako hiru hegaletan hiru amildegi bertikal. Ke laino batzuk zuzen zihoazen aire geldian gora, han goian galtzen zirelarik.

—Bai arraroa dela hau dena! —esan zuen Leninak—. Oso arraroa! —Hauxe zuen gaitzespen hitzik gogokoena—. Ez zait gustatzen. Eta gizon hau ere ez zait gustatzen —eta eurak herrira eramateko zen indio gidaria seinalatu zuen. Sentimendu haiek, jakina, alde bietakoak zi-

ren. Gizona aurretik zihoakien eta, beraz, bizkar aldea bakarrik ikusten zioten; baina hauxe ere higuingarri nonbait.

—Gainera —ekin zion Leninak, ahotsa jausiz—, kiratsa dario.

Bernardek ez zuen ukatzeko ahaleginik egin. Aurrera jarraitu zuen.

Honetan, kolpera, esan zitekeen guztia dantzan hasi zela, odolaren mugimendu asperkaitzez pilpilketa bizian. Han goian, Malpaisen, danbor hotsa entzuten zen: berez-berez, hankak ere bihotz misteriotsu haren erritmora jarri ziren, eta pausoa bizkortu zuten. Zekarten bideak amildegiaren barrenera eraman zituen. Goiko lautada handi haren hegalak edo saihetsak dorreak bezala igotzen ziren beren gainean, ia ehun metroko altueran.

—Hobe helikoptero bat ekarri bagenu —esan zuen Leninak, begiak haserrez jasorik haitzezko hormatzarrean gora—. Ibiltzeak nazka ematen dit. Gainera, lurrean honelako menditzar baten azpian, hain txiki dakusa nork bere burua!

Joan ziren goiko lautadaren itzalpeko bide-zidor batean barrena, irtenune baten ingurutik, eta han, urek landutako ataka batean, goranzko zurubia zegoen. Igo ziren errekagunearen bazter batetik bestera sigi-saga zihoan bidexka latz batetik. Batzuetan, danborren furrunda zeharo entzungaitza zen, besteetan berriz hurrengo bazter ostean ari zirela joka zirudien.

Erdi inguruan gorantz zihoazela, arrano bat hain hurretik pasa zitzaien hegan, non haren hegalak ateratako haize bolada sentitu baitzuten aurpegietan. Haitzaren tarte batean hezur multzo bat ageri zen. Absurdoa eta itogarria zen hura guztia, eta indiarrari gero eta kirats gehiago ze-

rion. Noizbait atera ziren trokarte hartatik eguzkiaren argitara. Lautadaren gainaldea lau-laua eta haizetsua zen.

—Charing-T-ko dorrea bezalakoa —komentatu zuen Leninak. Baina ez zuen denbora handirik eduki antz lasaigarri haren aurkitzeaz gozatzeko. Pauso hots astun batek jeurt eragin zien. Lepotik zilborreraino larru hutsik, beren gorputz beltzaran nabarrez («asfaltozko tenis pistak bezalatsu» esango zuen geroago Leninak) eta arabesko gorri, beltz eta horixkaz estalitako aurpegi zakarrez, bi indio korrika zetozen bidean zehar.

Azeri larruz eta franela gorriz trentzaturik zeukaten beren ile beltza. Indioilar lumazko manta bana zeramaten bizkarretatik zintzilik; bai eta lumazko koroa galantik ere buru bueltan, alai dizdiz. Ematen zuten pauso bakoitzean, zilarrezko eskuturrekoak eta hezurrezko eta turkesa garauzko idunekoak elkar joka zekartzaten, tintinketa alaia ateraz. Hurreratu ziren hitzik esateke; hotsik gabe korrika zetozen, orein larruzko abarkekin. Batek luma gandor bat zekarren; besteak urrunera hiruzpalau soka zati sendo ematen zutenak zekartzan esku bakoitzean. Soka bat bihurrika ari zen urduri, eta Lenina bat-batean konturatu zen sugeak zirela.

Gero eta bertarago zeuden; beren begi ilunez so egiten zioten, baina ezagutzeko keinurik txikiena egin gabe, haren existentziaz oharkabe baleude bezala. Lehengo suge urduri hura orain besteen gisa zegoen zintzilik. Bi gizonek aurrera segitu zuten.

—Ez zait batere gustatzen —hots egin zuen Leninak—, ez zait batere gustatzen.

Are gutxiago gustatuko zitzaion herrira sartzean aurkituko zuena. Hemen eurak bakarrik utzi zituen gidariak eta instrukzio eske sartu zen. Zikinkeria, zimaur pilak,

hautsa, zakurrak, euliak... Higuinaren higuinez muxinka, Leninak sudurrera eraman zuen zapia.

—Baina nola bizi daitezke honela? —leher egin zuen. Sinesgogor zegoen batetik, amorrutan bestetik. Hura ez zitekeen posible.

Bernardek bizkarrak uzkurtu zituen filosofiaz.

—Pentsa ezazu bospasei mila urte daramatzatela bizimodu honekin —esan zuen—. Dagoeneko ohituta egongo dira nonbait.

—Baina garbitasunak Fordtasunera garamatza —ekin zion Leninak.

—Bai, eta «zibilizazioa esterilizazioa da» —jarraitu zuen Bernardek, higiene elementaleko bigarren ikasgai hipnopedikoa osaturik ironia airez—. Baina jende honek ez du gure Forden izenik ere entzun inoiz, eta zibilizatzeko daude. Alfer-alferrikakoa da, beraz...

—Aizu, begira! —hots egin zuen Leninak, besotik oratzen ziola.

Han zetorren indio bat, ia larru hutsik, geldiro-geldiro auzo etxe bateko esku eskaileran behera, mailarik maila, kontuz-kontuz, zaharraren zaharrez dardarti. Begitarte beltz eta zimur-zimurra zuen, obsidianazko maskara antzo. Hortzik gabeko aho zuloa matrailen artean. Ezpain txokoetatik eta kokotsaren bi alderdietatik, bizar luze zurizka batzuk, larru beltzean behera zintzilik. Ile luzeak solte eta zintzilik, galpar grisak eratuz aurpegiko bi alderdietan behera. Gorputza makur eta ihar, hezur hutsik ia. Geldiro-geldiro jaitsiz zetorren, maila bakoitzean geldi, hurrengo pausoa botatzera menturatu baino lehen.

—Baina, zer gertatzen zaio? —marmartu zuen Leninak. Begiak izu eta harri zituen.

—Zaharra dela besterik ez —erantzun zuen Bernardek, ezaxola itxuraz kanpotik, baina urduri barrutik.

—Zaharra? —berresan zuen Leninak—. Baina... zuzendaria ere zaharra dugu; asko dago zaharrik baina ez honelakorik.

—Ez diegulako uzten honelakoak izaten. Eritasunetik jagoten ditugu. Barruko sekrezioak artifizialki orekatuak mantenarazten dizkiegu, beti gazte iraun dezaten. Ez dugu permititzen magnesio-kaltziozko oreka jaitsi dakien hogeita hamar urtetik behera. Odol gaztea sartzen diegu. Metabolismoa etengabe ernearazten diegu. Horra zergatik ez diren hau bezalakoak. Alde batera —gaineratu zuen—, gehienak agure honen edadera baino lehen hiltzen direlako. Gazte-gazte hirurogei urtetara arte, eta gero, plasta!, harenak egin du.

Baina Lenina ez zegokion adi. Agureari begira zegoen, geldiro-geldiro jaitsiz zetorrena. Azkenerako haren oinek ikutu zuten lurra. Eta buelta eman zuen. Begi argi-argiak ageri zitzaizkion begi zuloen sakonean, eta Leninari begira eduki zituen luzaro, batere bizitasunik gabe, sorpresarik gabe, Lenina han ez balego bezala. Gero, geldiro, bizkar-makur, agurea albotik pasa zitzaien eta joan zen.

—Ikusteko ere horrelakorik! —ekin zion Leninak—. Ikaragarria! Hobe etorri ez bagina.

Poltsikoak arakatu zituen soma errazioaren bila; baina —hura ere gertatu behar— fraskoa ostatuan utzi zuen ahaztuta. Bernarden poltsikoak ere hutsik zeuden.

Leninak ez zeukan beste erremediorik, Malpaiseko nabarmenkeriei inolako laguntzarik gabe aurrea ematea baizik. Eta nabarmenkeria nabarmenkeriaren gainean zetorren. Han ikusi zituen bi emakume gazte beren haurrei

titia emanez. Lenina lotsa-lotsa egin zen eta begiak apartatu behar izan zituen. Bizitza guztian ez zuen inoiz halako zikinkeriarik ikusi. Eta okerrago zena, Bernardek ezikusi egin beharrean, ekin eta ekin ziharduen erditzaileen ikustaldi nazkagarri hartaz. Somaren eragina ezabaturik, goizez ostatuan erakutsiriko ahultasunaz lotsa sentitu zuen, eta beste inoiz baino indartsu eta heterodoxoago jokatu zuen.

—Bai harreman miragarriak eta mamiak! —esan zuen aproposeko gordinkeriaz—. Nolako sentimendu biziak sortaraziko dituzten! Sarri pentsatu izan dut zerbait handia galdu dugula amarik ez edukitzeaz. Zuk ere zerbait galdu duzu beharbada ama ez izateaz, Lenina. Pentsa ezazu hementxe eserita zaudela, zeure ume batekin...

—Bernard! Nola dezakezu...?

Eskerrak oftalmia eta larruko gaitza zituen atsotxo bat handik pasa zen. Harexek baretu zion pixka bat haserrea.

—Goazen —erregutu zuen—. Ez zait batere gustatzen.

Baina mementu hartan gidaria itzuli zitzaien, eta segitzeko gonbidaturik, kalexka batean zehar abiatu ziren, etxe ilara biren artetik. Ertz batean ezkerretara hartu zuten. Han zetzan zakur bat, zimaurtzan hilda. Boziodun emakume bat zorriketan ari zitzaion neskato bati. Gidaria geratu zen esku-eskailera baten oinetan, jaso zuen eskua zuzen gorantz, eta berriro jaitsirik, aurrerantz seinalatu zuen. Leninak ta Bernardek gizon hark keinuka esandakoa egin zuten. Eskaileran gora jo eta ate bat aurkitu zuten, gela luze, estu eta ilun-ilun batera ematen zuena. Gela hari bazerion ke, koipe erre eta arropa zahar zikinen hatsik franko. Gelaren haraindiko aldean beste ate bat,

eguzkitara zegoena. Danborren tarrapata gogorra eta hurbila entzuten zen bertatik.

Ate honetatik atera eta terraza handi batera jo zuten. Azpian, anitz etxe alturen erdian, herriko plaza zegoen, indioz josia. Kolore biziko mantarrak eta lumak adats beltzetan, turkesak distiraka eta larru beltzak izerdiaren izerdiz argituta. Leninak berriro eraman zuen zapia sudurrera. Plaza erdiko zabalgune batean adreiluzko eta buztin zapalduzko bi plataforma biribil zeuden. Bistan zegoen lurpeko bi ganbaren teilatuak zirela, zeren plataforma bakoitzaren erdian leiho bana baitzegoen zabalik, leiho bakoitzaren aho beltzera esku-eskailera bana zetorrela. Bi leihoetatik txirula hots arin bat entzuten zen, danborren etengabeko tarrapataz ia itoa.

Berauek Leninari gustatu egin zitzaizkion. Begiak itxita, haien taparrada sarkor eta etengabearen menera erortzen uzten zuen burua, eta hartaz bere izatasun guztia bete arte gelditu zen munduan hotsezko taupada sakon hura besterik ez balego bezala. Forden egunaren Elkarte-Zerbitzuetako soinu sintetikoak begitantzen zitzaizkion lasaigarriro. «Uhuhu-Ahaha», esan zuen isilik. Danbor haiek erritmo berberaz jotzen zuten.

Honetan kantu hots izugarria entzun zuten: ehundaka gizon-ahots oihuketa bizian ari ziren, metalezko danbarrada latza ateratzen zutelarik. Gero, zorrozki eta txilio desafinatuz, emakumeen erantzuna. Gero danborrak berriro; eta ondoren gizonen gizatasunaren afirmazio basatia.

Arraroa, bai. Lekua arraroa, bai eta musika ere, eta ez gutxiago janzkerak, bozioak, larruko gaitzak eta atso-agureak. Baina espektakulua bera ez zen berez hain arraroa.

—Kasta apaleko Elkarte kanta bat gogorarazten dit —esan zuen Bernardek.

Geroxeago, ordea, ez zion halako funtziorik gogoraraziko, zeren, bapatean, munstro pila beldurgarria agertu baitzen soto borobil haietatik. Maskara izugarriz estaliak eta gizon itxura ere arras galtzeraino pintatuak, dantza estrainio bat dantzatzen hasi ziren plaza inguruan; jira eta jira, gero eta azkarrago; danborrek erritmoa aldatu eta bizkorrago ziharduten, sukarraren taupaketa belarrietan oroitarazten zutelarik. Eta jendea dantzariekin batera kantatzen hasi zen, gero eta gogorrago. Lehenbizi emakume batek irrintzi egin zuen, gero beste batek, eta beste batek... hilko balituzte bezala. Honetan dantzari burua atera zen korrutik eta plaza ertzean zegoen zurezko kutxarantz abiatu zen korrika. Jaso tapa eta suge beltz pare bat atera zuen bertatik. Jende guztiak garrasi galanta bota zuen, eta gainetiko dantzariak ere korrika zihoazen berarengana, eskuak luzaturik.

Gizonak lehenen heldu zirenei jaurtiki zizkien sugeak, eta kutxara itzuli zen gehiago hartzeko. Hamaika suge beltz eta nabar atera zituen, atera ahala dantzariei aurpegira jaurtikiz. Gero berriro hasi zuten dantza, baina beste erritmo batez.

Dantzariak jira eta bira ari ziren, sugeak eskuetan eta suge antzera beraiek ere, belaunei eta gerriei ondulaziozko mugimendutxoa eraginez. Jira eta bira aspertzeke. Gero nagusiak seinale bat egin zuen, eta banan-banan, suge guztiak plaza erdira jaurtiki zituzten. Agure bat atera zen lurpetik eta arto irina bota zien. Emakume bat agertu zen beste leihotik eta pitxar beltz bete ur bota zien. Gero agureak eskua jaso zuen eta isiltasun osoa, beldurgarria egin zen. Danborrak mututu ziren. Bizitza eten hurran zela zi-

rudien. Lurpeko mundura ematen zuten bi leihoak seinalatu zituen agureak. Eta geldiro-geldiro, esku ikuskaitzek jasota, han ageri ziren behetik gora, arrano pintatu bat leiho batetik eta gizon bat biluzik eta gurutzean josia bestetik. Igo ziren eta airean zintzilik zeudela ematen zuten, espektakuluari begira bezala. Agureak txalo bat jo zuen. Ia biluz-biluzik —kotoizko oihal zuri motz bat bakarrik—, hamazortzi urte inguruko mutil bat jendartetik atera eta denen aurrean zutik geratu zen, eskuak bular gainean gurutzatuak eta burua makur. Agureak gurutze seinalea egin zion eta erretiratu zen. Astiro-astiro, mutila jiraka hasi zen, han bihurrika zetzan suge multzoaren inguruan. Lehenengo buelta bukatu eta bigarrenaren erdian zihoala, gizon luze bat atera zen dantzarien artetik, eta beraganantz zetorkion, koiote maskara buruan eta larru trentzatuzko zigorra eskuan. Mutila ibiltzen zebilen, beste inor zegoenik ere konturatuko ez balitz bezala. Gizon koioteak astindu zuen zigorra; espektazio une luzea egon zen; gero mugimendu bizkor bat, zigorrak dzist airean eta zart haragian. Mutilari dardar jarri zitzaion gorputza. Baina ez zuen ahoa ireki ere eta bueltaka jarraitu zuen, lehengo pausakera geldi eta neurtuan. Koiotea berriro ere joka hasi zitzaion. Zartada bakoitzak larriunea sortarazten zuen lehenengo jendartean eta hasperen sakona gero. Mutilak bueltaka jarraitu zuen. Bi buelta, hiru, lau. Odola zerion. Honetan Leninak aurpegia estali zuen eskuekin eta negarrari eman zitzaion.

—O!, aski da, aski da! —erregutu zuen.

Baina zigorrak zirti eta zarta ziharduen, urriki gabe. Zazpi buelta. Orduan, bapatean, albo-alboka hasi zen mutila, eta aiene bat jaurtitzeke, muturrez aurrera jo zuen lurra. Agureak, gainera makurturik, bizkarrean ikutu zuen

luma luze zuri batez; jaso zuen gorantz luma, odol gorriz bustia, herriak ikus zezan eta hiru aldiz astindu zuen sugeen gainean. Tantaren batzuk erori ziren eta danborrak tarrapataka hasi ziren berriro, notazko lasterketa eroari emanak. Jendeak garrasi unanime bat jaurtiki zuen. Dantzariek aurrerantz saltatu, sugeak hartu eta ihes egin zuten plazatik. Gizon, emakume eta haur, denak haien atzetik korrika. Handik minutu batera plaza hutsik zegoen. Mutila bakarrik zetzan han, ahoz behera, eroritako lekuan bertan, geldi-geldi. Hiru atso atera ziren etxe batetik, eta ozta-ozta altxaturik, barrura eraman zuten. Arranoak eta gizon gurutzatuak han jarraitu zuten goardia eginez plaza hutsaren aurrez aurre. Gero, nahikoa ikusi balute bezala, leihoetan behera aldendu eta lurpeko munduak irentsi zituen bere golkoan.

Lenina negarrez oraindik.

—Ikaragarria! —zioen behin eta berriro, Bernarden kontsolamenduak alferreko zitzaizkiolarik—. Ikaragarria! Odol hori! —Dardarka ari zen—. Eta gramo bat somarik ere ez!

Barruko gelan pauso hotsa zen. Terrazara azaldu zitzaien gaztea indioz jantzirik zetorren, baina haren ile txirikordatuak lasto kolorekoak ziren, begi urdinak zituen, azal zuria, nahiz eta eguzkiak brontzeatu.

—Hola. Egunon —esan zuen ezezagunak, ingeles zuzen baina arraroz—. Zuek zibilizatuak zarete, ezta? Beste Mundutik, Erreserbaz kanpotik zatozte, ez al da egia?

—Baina zein deabru...? —hasi zen harriturik Bernard. Gazteak hasperen egin eta buruari eragin zion.

—Zein zorigabea gizon hau —esan zuen. Eta plaza erdiko odoldurak seinalaturik, gaineratu zuen—: ikusten al duzue odoldura madarikatu hori?

Eta emozioz dardarka zeukan ahotsa.

—Hobe gramo bat dioskada bat baino —esan zuen Leninak mekanikoki, eskurik aurpegitik kentzeke—. Ai soma pixka bat banu!

—Neuk behar nuen hor egon —jarraitu zuen gazteak—. Zergatik ez didate hilgai izaten utzi? Nik hamar buelta, hamabi, akaso hamabost emango nituen. Palowhtiwak zazpi bakarrik eman ditu. Doble odol atera ahal izango zidaten. «Gainezkaturiko itsasoak odoleztatu». —Eskuak zabal-zabal egin zituen eta gero erortzen utzi etsipenez—. Baina ez ditate uzten. Ez natzaie atsegin, neure larru honen koloreagatik. Beti izan da honela. Beti.

Gazteari negar malkoak azaldu zitzaizkion begietara eta, lotsaturik, aurpegia bueltatu zuen. Harrituaren harrituz, Leninari ere ahaztu zitzaion soma kontua. Ikusi zuen aurpegi hura eta lehenengoz begiratu zion ezezagunari.

—Ez al duzu esan nahiko desiatzen zeundela zigor harekin azota zintzaten?

Oraindik aurpegia bueltaturik, gazteak baietz esan zuen buruaz.

—Herriaren onerako; euria egin dezan eta artoak haz daitezen. Eta Pookong-i eta Jesus-i atsegin nakien. Bai eta erakusteko ere kapaz naizela txistik egiteke oinazeari eusteko. Bai —eta ahoskera berria harturik, kolpera buelta eman zuen, bizkarrak trinko eta kokotsa gorantz urguiluz eta desafioz—, bai, gizona naizela erakusteko, edozer… O!

Arnasa bukatu zitzaion eta mutu geratu zen ahoa zabalik. Bere bizitzan lehenengoz zekusan neskatxa bat, txokolate edo zakur larru koloreko matrailarik ez zuena; ordea, gaztaina koloreko ile kizkurra zuena, eta (nobedade harrigarria) arreta samurrezko aurpegikera zuena.

Leninak irribarre egiten zion: «Bai mutil liraina —pentsatu zuen—. Gorputz ederrekoa benetan». Mutilari odol kolpea igo zitzaion aurpegira. Begiak jaitsi eta berriro jaso zituen, Lenina irribarrez ikustearren bakarrik. Baina hura irribarrez ikusteak hain artegarazi zuen, non berriro aurpegia bueltatu eta plaza ertzeko zerbaiti begira zegoen planta egin behar izan baitzuen.

Bernardek galdera batzuk egin eta estutasunetik atera zuen. Nor? Nola? Noiz? Nondik? Bernardi begira adi-adi (hain gartsuki desiaturik Lenina irribarrez ikustea, ez baitzitzaion begiratzen ere ausartzen), mutila saiatu zen gauzak esplikatzen. Linda eta biak —Linda bere ama zuen— (hitz honek estutasun ederra eman zion Leninari), arrotzak ziren Erreserban. Linda Beste Mundutik etorria zen aspaldidanik, bera jaio aurretik, bere aita zuen gizon batekin. (Bernardek belarriak zorroztu zituen) Linda paseo bat ematera joan zen behin, bera bakarrik, Iparraldeko mendietan zehar, eta amildegi batean behera erori eta burua zauritu zitzaion.

—Segi, segi —esan zuen Bernardek, arras larrituta.

Malpaiseko ehiztari batzuek aurkitu eta herrira ekarri zuten. Mutilaren aita zen gizona Lindak ez zuen gehiago inoiz ikusi. Tomakin zeritzan. (Bai, «Thomas» zen I.E.Z.ren bataio izena.) Berriro joan bide zen Beste Mundura, Linda gabe. Gizon zatarra, faltsua eta gaiztoa zen dudarik gabe.

—Eta honelaxe jaio ninduzuen Malpaisen —bukatu zuen gazteak—. Malpaisen.

Eta buruari eragin zion.

Zer zikinkeria herri aldameneko etxetxo hartan!

Handik herrirako bitartea hautsez eta satsez josita zegoen. Etxe aurrean bi zakur goseti muturka zebiltzan naz-

kagarriro sats artean. Barrura sartu zirenean, bazen hatsik eta euli hotsik erdi itzal hartan.

—Linda! —hots egin zuen mutilak.

Barrutik emakume ahots latzak erantzun zuen.

—Banoa!

Zain egon ziren. Katilu batzuk ageri ziren lurrean bazkal hondakinez, edo bazkari batzuetako hondakinez beteak.

Ireki zen atea. Gorputz galanteko emakume indiar beilegi bat atetik irten eta arrotzei begira geratu zitzaien, sinesgogor eta aho zabal. Lenina desgogoz konturatu zen bi hortz falta zituela. Eta geratzen zitzaizkionen kolorea ere... Ikaraz hartu zuen. Agurea bera ere baino okerrago. Eta hain gizena! Aurpegi guztia hanturaz eta zimurduraz betea. Eta masail zimel haiek, gorriduraz beteak! Eta zain gorri haiek sudurrean! Eta begi odoldu haiek! Eta lepo hura... lepo hura! Eta buruan zeraman manta zahar zikina! Eta atorra latz ilun haren azpian, bulartzar haiek, sabeltzar hura, aldakak...! O!, lehengo agurea baino askoz okerrago, mila bider okerrago! Eta honetan, emakume hura hitzontzi bihurturik, korrika abiatu zen Leninarenganantz eta (Ford, Ford! nazkagarria zen hura. Beste edonoiz izan balitz ondoezik zegoen ia)... eta bere sabelaren kontra, bere bularraren kontra estutuz, musuka hasi zitzaion. Ford!, musuka adurra zeriola, eta hura kiratsa, ez bide zuen sekula bainurik hartu, gorputz osoak usaintzen zuen Delta eta Epsilon botiletan jartzen den gaiak bezala (ez, Bernardena ez zen egia), alkoholezko sunda zen hura, zalantzarik gabe.

Bekoz beko zegoen berarekin. Haren begitarte handitua negarrez ari zen.

—O, enetxo! —Hitz jarioa negar-zotinetan itotzen zitzaion—. Bazeneki zein zoriontsu nauzun! Hainbeste urte eta gero! Aurpegi zibilizatu bat! Bai, eta soineko zibilizatuak! Benetako azetato sedazko soinekorik ez nuela gehiago inoiz ikusiko uste nuen. —Leninaren brusako mauka ukitu zuen. Atzazal beltzak zituen—. Eta galtza labur dotore horiek! Aizu! Oraindik kutxa batean gorderik dauzkat nire soineko zaharrak, hona etortzean ekarri nituenak. Gero erakutsiko dizkizut. Azetatoa, hala ere, guztiz zulaturik dago. Baina kartutxontzi zuri polit bat badut oraindik. Zure larru berdezko hori, hala ere, askoz politagoa da. Baina alfer-alferrekoa izan zitzaidan kartutxontzia! —eta negarrari ekin zion berriro—. Kontatuko zizuen Johnek guztia. Gorriak ikusi nituen! Eta gramotxo bat somarik ere gabe! Meskal zurrut bat bakarrik Popék zekarkidanean! Nire lehenagoko mutil lagun bat duzue Popé. Baina meskalak ajea, latza uzten du eta peyotlek gaixotzen. Eta okerrago zena, biharamunean lotsa-lotsa sentitzen nintzen. Eta egon ere arras lotsaturik nengoen! Pentsa ezazu mementu batez: nork eta nik, Beta nintzen honek, zer eta seme bat erditu. Jar zaitez nire lekuan. (Pentsatze hutsak ere dardar eragiten zion Leninari.) Eta zinez diotsut, ez zela nire errua. Oraindik ez dakit nola gerta zitekeen hura, ariketa malthustar den-denak egiten bainituen; badakizu nola, aldizka: bat bi, hiru, lau. Zinez diotsut baina kontua da gertatu egin zela; eta, jakina, hemen Aborto-Gunerik batere ez zegoen. Bide batez: oraindik irauten du Chelseakoak? —galdetu zuen.

Leninak buruaz baiezkoa egin zuen.

—Astearte-ostiraletan oraindik erreflektagailuz argitzen segitzen al du?

Leninak berriro ere baietz.

—Bai zoragarria kristal larrosazko dorre hura!

Linda gaixoak, begiak itxita, aurpegia altxatu zuen eta, estasian bezala, bere oroimenaren irudi argitsua ikusi zuen.

—Eta ibaia, gauean... —esan zuen isilik.

Malko lodiak zerizkion betazal itxien artetik.

—Eta Stoke Pogesera bueltako bidaia, abioiz, gauez... Eta gero bainu beroa eta bibro-masaia... Hemen, ordea...

Ahokada handi bat aire hartu, buruari eragin, begiak berriro ireki, mukiei bi aldiz gorantz tiratu, gero hatzekin zintz egin eta atorrarekin lehortu.

—O, barka! —Leninari nazka eman ziola ikusirik—. Ez nuen egin behar, barka. Baina zer egin dezakezu musuzapirik ez denean? Gogoan dut nola zeharo amorrarazten ninduten zikinkeria guzti hauek, asepsia falta honek. Hona ekarri nindutenean, zauri izugarri bat nuen buruan. Ez dezakezu asma ere zer ipini zidaten bertan. Zikinkeriak, zikinkeria hutsak. «Zibilizazioa esterilizazioa da» esaten nien nik. Eta «zoazte ene estreptokoko hegaldunaz Banbury T-ra, bainutegi eta komun ederrak ikustera», haurrak balira bezala. Baina, jakina, ez zidaten konprenitzen. Alfer-alferrik. Eta azkenerako, ohituz joan nintzela uste dut. Gainera, zer higiene eduki dezakezu ur berozko instalaziorik ez den lekuan? Begira arropa horiei. Animalien ilea ez da azetatoa bezalakoa. Betirakoa duzu. Apurtzen baldin bada, adobatu egin behar duzu. Baina ni Beta naiz. Ernaltze Gelan egiten nuen lan. Inork ez zidan inoiz honelako gauzarik irakatsi. Ez zen nire egitekoa. Gainera, txartzat jotzen zuten. Arropak apurtzean, jaurtiki egin behar ziren eta berriak erosi. «Zenbat eta adobatze gehiago, hainbat eta diru gutxiago». Ez al da egia? Adobatzeak an-

tisozialak ziren. Baina hemen guztiz bestela da. Zoro artean bizitzea halakoxea da. Egiten duten guztia erokeria hutsa da.

Lindak ingurura begiratu zuen. Johnek eta Bernardek bakarrik utzi zituztela eta paseatzen ari zirela ikusi zuen kanpoko hauts eta sats artean. Hala ere, konfidentzia gisa, jaitsi zuen ahotsa, eta hain hurreratu zituen ezpainak Leninaren belarrira, non haren arnasak —enbrioientzat pozoi— neskatxaren masaileko bixartxoak astindu baitzituen.

—Esaterako —marmartu zuen—, hemengo jendeak duen elkar edukitzeko modua. Erokeria, sinets iezadazu, erokeria hutsa. Mundu guztia mundu guztiarena da, ez al da? Ez al da egia? —ekin zion, Leninari maukatik tiratuz. Leninak, burua apartaturik, baietz esan zuen; ordura arte eutsirik zeukan airea jaurtiki eta usain gaiztoetatik libre samar zegoen beste ahokada bat hartu zuen—. Hona, bada —jarraitu zuen Lindak—, hemen jakintzat ematen dizute bakar batena izan behar duela batek. Eta beste gizonen batzuekin traturik baldin baduzu, txartzat eta antisozialtzat hartzen zaituzte. Gorroto eta arbuio hartzen dizute. Behin emakume talde bat etorri eta egundoko eskandalua armatu zuten beren gizonak ni ikustera zetozelako. Beno, eta zergatik ez? Eta eman ahalak eman zizkidaten... Ikaragarria izan zen. Ez, ezin diezazuket konta. —Lindak aurpegia eskuekin estali zuen eta dardarka jarri zen—. Higuingarriak dira hemengo emakumeak. Eroak, eroak eta krudelak. Eta, jakina, tutik ez dakite ariketa malthustarrez, ez fraskoez, ez dekantamenduez, ez ezertaz. Honegatik umeak eta umeak egiten dituzte... zakur emeek bezala. Nazkagarriak dira. Eta pentsatzea ere nik... O, Ford, Ford, Ford! Eta, hala eta guztiz ere, kon-

tsolamendu itzela izan zen niretzat John. Ez dakit zer egingo nuen bera gabe. Nahiz eta senetik aterea jartzen zen, gizonen bat... nigana... Eta txiki-txikitatik hori. Behin, ia hazitxo zela, Waihusiwa gaixoa akabatu nahi izan zuen, edo ez dakit ondo Popé zen ere; eta dena noiz edo noiz ni ikustera etortzen zirelako. Ez nuen inoiz lortu pertsona zibilizatuek beti honelaxe jokatu behar dutela konpreniaraztzerik. Zorotasuna itsaskorra da, nik uste. Nolanahi ere, badirudi Johnek indiarrengandik hartu duela hori, bizi ere beren artean bizi baita gehiena. Nahiz eta oso gaizki tratatzen zuten beti eta ez zioten uzten beste mutilek egiten zutena egiten. Eta hori zortea zen nolabait, zeren honela errazago baitzitzaidan mutila pixka bat egokitzea. Hainbeste gauza dago egon ere batek ez dakiena! Egia esan, ez nuen jakiteko motiborik ere. Nahi dut esan, haur batek galdetzen dizunean helikopteroak nola funtzionatzen duen edo mundua nork egin duen... zer erantzun dezakezu Beta baldin bazara eta Ernaltze Gelan lan egin baduzu beti? Zer erantzun dezakezu?

# ZORTZIGARREN KAPITULUA

Kanpoan, hauts eta sats artean (ordurako lau zakur zeuden ia), Bernard eta John paseatzen ari ziren geldiro.

—Niri ez zidak buruak ematen —zioen Bernardek— nola daitekeen... Planeta diferenteetan eta mende diferenteetan bizi bagina bezala duk. Ama, eta zikinkeria guzti hau, eta zahartzea, eta eritasuna... —buruari eragin zion—. Asma ere ezinezkoa duk ia. Ez diat inoiz konprenituko, esplikatzen ez badidak behintzat.

—Zer esplikatu baina!

—Hauxe —Eta Bernardek herria seinalatu zuen—. Eta hauxe. —Oraingoan aldameneko etxetxoa seinalatu zuen—. Dena, hire bizitza osoa.

—Baina zer esan dezaket, bada, nik?

—Den-dena, hasiera-hasieratik. Gogora haitekeen lehenendik.

—Gogora naitekeen lehenendik...

Johni betoskoa zimurtu zitzaion.

Isilune luzea eduki zuten gero.

Bero handia zegoen. Arto gozozko talo asko janda zeuden biak. Lindak honela esan zion:

—Zatoz lo egitera, haurra.

Eta ohe zabal hartan elkarrekin etzan ziren.

—Kanta ezazu.

Eta Lindak kantatu. Kantatu zuen «Estreptokoko gainean Banbury T-ra» eta «Agur, kutuna, laster behar duzu dekantatu».

Haren ahotsa gero eta ahulago egin zen.

Zarata handi bat entzun zen eta ikaratuta itzarri zen. Ohe ondoan gizon bat zegoen, erraldoi, izugarri. Lindari zerbait esaten ari zitzaion eta Lindak barre egiten zuen. Andreak izara kokotseraino altxatua zuen, baina gizonak berriro eraitsi nahi zion. Haren ileak soka beltz biren antzekoak ziren eta besoaren inguruan zilarrezko eskuturreko eder bat zuen, harri urdinduna bera. Eskuturreko hura atsegin zuen, baina beldur zion, hala ere, gizonari; aurpegia Lindaren gorputzean gorde zuen. Lindak eskua jarri zion gainean eta honela segurkiago sentitu zen. Beste hitz haiek ez zituen hain ongi ulertu.

—Johnen aurrean ez. —Gizonak begiratu egin zion mutikoari, gero Lindari, eta beroni zerbait esan zion isilka. Lindak «ez» esan zuen. Gizona ohean makurtu zen eta haren aurpegia handi eta ikara ematekoa zen. «Ez», errepikatu zuen Lindak, eta mutikoak beronen eskuak gogorkiago oratzen ziola sentitu zuen. «Ez, ez!». Baina gizonak beso batetik hartu zuen; min ematen zion eta oihu egin zuen. Gizonak bi eskuez oraturik altxatu zuen.

Lindak oraindik lotuta zeukan, eta bazioen: «Ez, ez!». Gizonak zerbait arin eta latz esan zuen eta orduan Lindaren eskuek, supitoki, libre utzi zuten. «Linda, Linda!» John ostikoka eta bihurrika ari zen; baina gizonak gelatik

zehar eraman, atea ireki eta kanpora jaurtiki zuen, beste gelaren erdira, eta atea itxiz joan zen. Bera, altxaturik, aterantz abiatu zen. Oinen puntetan jarririk zurezko krisket handiraino heltzen zen ozta-ozta. Zutiturik bultza egin zuen, baina atea ez zen ireki. «Linda!», egin zuen oihu. Baina Lindak ez zion erantzunik eman.

John gela handi-handi, ilun-ilun batez gogoratzen zen. Bazen bertan zurezko tramankulurik, sokaz loturik, eta tramankulu haien inguruan, anitz emakume zutik, burusiak iruten, Lindak esan zionez. Zoko batean esertzeko agindu zion Lindak, beste haurrekin batera. Honetan, bapatean, jendea oso gogor mintzatzen hasi zen eta emakume batzuek bultzaka ari ziren Linda, eta Linda negarrez zegoen. Linda korrika abiatu zen aterantz, eta John atzetik. Ea zergatik zeuden haserre galdetu zion.

—Gauza bat apurtu dudalako —esan zuen Lindak. Eta orduan bera ere haserreak hartu zuen—. Zer dakit nik ezer horien deabruko ehungintzaz? —esan zuen— Basati alenak!

«Basatiak» zer ziren galdetu zion Johnek. Etxerakoan, Popé aurkitu zuten atean eta berekin sartu zen. Kalabaza handi bat zeraman ur antzeko likidoz betea. Baina ez zen ura, hatsa zerion, ahoa erretzen eta eztul eragiten zuen. Lindak pitin bat edan zuen, bai eta Popék ere. Gero Lindak barre handiak egin zituen, eta txit altu mintzo zen eta azkenez Popé eta biak alboko gelara sartu ziren. Popék aldegitean, John sartu zen gelan. Linda etzanik zegoen hain lo gogorrean, berak ezin izan baitzuen iratzarri.

Popé maiz etortzen zitzaien etxera. Kalabazako likido hari «meskal» zeritzala zioen; Lindak, ordea, «soma» behar zuela izentzat zioen. Nahiz eta gero ondoezik uzten

zuen. Johnek gorroto zuen Popé. Denak zituen gorroto, Linda ikustera zetozen gizon guztiak. Arratsalde batez, beste haurrekin olgetan ibili eta gero —hotz egiten zuela eta mendiak elurretan zeudela gogoratzen zen—, John itzuli zen etxera, eta berbaro garratza entzun zuen logelan. Emakumeak ziren eta berak ulertu ezineko hitzak esaten zituzten. Baina bazekien hitz ikaragarriak zirela. Gero bapatean, blasta!, zerbait lurrera erori zen. Jende hotsa entzun zuen eta beste zarata bat ondoren, mandeme bat jipoitzen dutenean bezala, baina mandeme haragitsua. Gero Lindaren txilioak: O!, ez, ez, ez!

John korrika sartu zen. Mantu beltzezko hiru emakume zeuden. Linda etzanik zegoen. Emakume batek eskuturretatik eusten zion. Bestea hanken gainean trabes jarrita zegokion, ostikadarik jaurtiki ez zezan. Eta hirugarrenak zirti eta zarta zigor batez. Bat, bi, hiru bider; eta bakoitzean Lindak txilio. Johnek emakumearen mantu ertzari oratu zion negarrez. «Mesedez, mesedez». Libre zeukan eskuaz emakumeak albora jaurtiki zuen. Zigorra berriro joka, Linda berriro txilioka. Emakumearen esku gogor beltzari bereekin oratu zion Johnek eta ahal adinako haginkada eman zion. Emakumeak garrasi egin zuen, oraturik zeukan eskua askatu eta eman zion sakadaz lurrera eraitsi zuen. Emakumeak hiru bider azotatu zuen zigorraz. Inoiz ezerk ez bezalako mina eman zion: suak bezala. Zigorrak txistu berriro eta zarta. Baina oraingoan Lindak egin zuen txilio.

—Baina zergatik jo nahi zintuzten, Linda? —galdetu zion gau hartan.

John negarrez ari zen, bizkarrean zituen zigorraren seinale gorriek min izugarria ematen baitzioten. Baina negar egiten zuen baita ere jende hura hain astoa eta gaiztoa

zelako, eta bera haur zelako soilik eta haien kontra ezer egiterik ez zuelako.

—Zergatik jo nahi zintuzten, Linda?

—Ez zekiat. Nola jakin dezaket, bada, nik?

Nekez uler zezakeen zer zioen, zeren Linda ahoz behera baitzetzan eta aurpegia burkoan ehortzia baitzuen.

—Gizon hauek beren gizonak direla zioate —jarraitu zuen. Eta mutilari ez baina bere baitan zeukan norbaiti hizketan ari zitzaiola ematen zuen. Solasaldi luzea izan zuen, baina Johnek ez zion deusik konprenitu. Azkenez Lindak garrasi egin zuen berriro, inoiz baino zorrotzago.

—O!, ez egin negarrik, Linda! Ez egin negarrik!

Johnek bortxaz besarkatu zuen. Beso bat lepotik bueltan jarri zion.

Lindak oihu egin zuen:

—Kontuz! Ene bizkarra! O!

Eta bortxaz apartatu zuen beregandik. John hormaren kontra joan zen buruz aurrera.

—Astotzar hori! —hots egin zion amak. Eta bapatean zipli eta zapla hasi zitzaion. Behin, eta beste behin, eta beste behin…

—Linda! —hots egin zuen Johnek—. O!, ama, ez, ez!

—Ni ez nauk hire ama. Nik ez diat nahi hire ama izan.

—Baina Linda! Ai!

Beste masaileko bat.

—Basati eme bihurtu nauk —oihukatu zuen Lindak—. Umeak egiten dizkiat animaliek bezala… Hiregatik izan ez balitz, Inspektorearengana aurkez nintekeen, alde egin nezakeen hemendik. Baina ez seme batekin. Lotsagarriegia izanen huan.

Johnek igarri zion berriro ere jotzera zetorrela eta beso bat altxatu zuen aurpegia jagoteko.

—O!, ez, Linda, mesedez!

—Astakume hori!

Lindak besoa jaistarazi zion aurpegia agerian utzirik.

—Ez, Linda, ez!

Johnek begiak itxi zituen, kolpearen zain.

Baina Lindak ez zuen jo. Geroxeago Johnek berriro zabaldu zituen begiak eta ama begira zegokiola ikusi zuen. Honetan Lindak besarkatu zuen eta musuka hasi zitzaion, behin eta berriro.

Noizik behin, egun oso batzuetan, Linda ez zen jaikitzen. Ohean gelditzen zen, tristuraz beteta. Edo bestela Popék ekartzen zion likidoa edaten zuen, eta barre-algaraka egin ondoren lotara joaten zen. Batzuetan gaixorik egoten zen. Maiz mutila garbitzeaz ahaztu egiten zen eta anitz egunetan talo hotzak beste jatekorik ez zuten. Oraindik gogoan zituen haren izugarrizko oihuak bere buruko ileetan halako zomorroak topatu zituelako.

Mementurik zoriontsuenak Lindak Beste Munduaz hitz egiten zizkionak ziren.

—Eta benetan al diozu nahi duzun edonoiz hegan egin dezakezula?

—Bene-benetan.

Eta Lindak anitz gauza kontatzen zion: kutxa batetik ateratzen zen musika eder hura, zer olgeta bikainak zituzten, zer janari eta edari gozoak, zer argi ateratzen zen hormako aparailutxo bati sakatuz bakarrik, zein pelikula politak entzun, ukitu eta ikus zitzaketen; beste usain goxozko kutxa hura, etxe larrosa, berde, urdin eta zilarrezko haiek, mendiak bezain altuak; eta mundu guztia zoriontsu, eta inor ere ez tristerik edo haserre; eta nola mundu

guztia mundu guztiarena zen, eta nola kutxa batzuek munduko beste ertzean gertatzen zen guztia ikusarazten eta entzunarazten zieten, eta haurrak frasko garbi ederretan, garbi-garbi dena, usain txarrik gabe, zikinkeriarik gabe... Eta inor ere ez bakarrik, denak elkarrekin baizik, alai eta zoriontsu, Malpaiseko udako dantzetan bezalatsu, baina askozaz zoriontsuago, zeren hango zoriona egunerokoa baitzen, betikoa... Johnek liluraz aditzen zion luzaro. Batzuetan, bera eta beste haur batzuk jolasteaz aspertuta zeudenean, herriko zaharretarik bat, beste hizkuntzaz, Munduaren Itxuraldatzaile Nagusiaz mintzatzen zitzaien, bai eta Esku Eskuin eta Esku Ezkerraren arteko burruka luzeaz, Lehortearen eta Hezetasunaren artekoaz; Awonawilonaz, zeinak gau batez pentsaturik, laino zarratu bat eratu baitzuen, laino horrexetatik Mundua sortu baitzuen; Ama Lurraz eta Aita Zeruaz; Ahaiyutaz eta Marsailemaz, Gerraren eta Halabeharraren biki zirenaz; Jesusez eta Pukong-ez; Mariaz eta Etsanatlehiz, hots, gazte bilakatzen den emakumeaz; Lagunan zegoen Harri Beltzaz eta Arrano Handiaz eta Andre Mari Acomakoaz. Istorio estrainioak, are miresgarriagoak, oraindik guztiz ulertzen ez zuen beste hizkuntza batez kontatzen zizkiotelako. Ohean luze etzanik, Zeruan eta Londresen eta Andre Mari Acomakoan zerabilen gogoeta, bai eta frasko fin eta garbitan sarturiko haurren ilada luze-luze haietan, eta Jesus hegan zihoala, eta Linda hegan zihoala, eta Inkubamenduko Mundu Mailako Gunean, eta Awonawilonan.

Gizon asko zetorren Linda ikustera. Mutikoak atzamarraz seinalatzen hasi zitzaizkion. Linda gaiztoa zela zioten beren hizkuntza arrotzez. Johnek konprenitzen ez zituen izenez deitzen zuten, baina bazekien izen gaiztoak zirela. Egun batez kanta bat kantatzen ari ziren Lindari

buruz, behin eta berriro. Johnek harrika egin zien. Berek ere eraso zioten, eta harrikada zorrotz batek masaila zauritu zion. Odola etengabe zerion, berehalaxe odoleztaturik geratzeraino.

Lindak irakurtzen irakatsi zion. Ikatz zati batez irudiak horman marraztu —animalia bat etzanda, haur bat botila barruan— eta gero alboan zer hauek idazten zituen: «Katua lo dago», «Haurtxoa botilan dago». Johnek azkar asko eta aise ikasten zuen. Amak horman idatzitako hitzak ikasi zituenean, Lindak bere zurezko kutxa handia ireki eta liburuxka mehe-mehe bat atera zuen inoiz erabiltzen ez zituen galtza gorri dotore haien azpitik. Lehendik ere sarritan ikusia zeukan Johnek.

—Handi egitean —ziotsan beti amak— irakurri ahal izango duk.

Handitu zen, bada, eta bai harro zegoela gure mutila.

—Beldur nauk ez zaiala askorik gustatuko —esan zuen Lindak—, baina daukadan bakarra duk. —Eta arnasa hartu zuen—. Ikusi ahal bahitu Londresen dauzkagun irakur makina bikainak!

John irakurtzen hasi zen. *«Enbrioiaren Egokitze kimikoa eta bakteriologikoa. Enbrioi Biltegiko Beta langileentzako Jarraibideak»*. Titulua irakurtzea bakarrik ordu laurden kosta zitzaion. Johnek lurrera jaurtiki zuen liburua.

—Liburu itsusiagorik! —hots egin zuen.

Eta negarrari eman zion.

Mutil koxkorrek segitzen zuten Lindari buruzko beren kanta zitalarekin. Eta inoiz burlaka ere hartzen zuten, hain baldres jantzirik zebilelako. Soinekorik apurtzean, Lindak ez zekien adobatzen. Beste Munduan, amak esan

zionez, arropa zaharrak jaurtiki eta berriak erosi ohi zituen.

—Mari traskil, Mari saskel! —hots egiten zioten mutil koxkorrek.

«Baina nik bazekiat irakurtzen —zioen bere baitan Johnek—, eta horiek ez. Irakurtzea zer den ere ez zekiate». Honelako hauek pentsatzen saiatuz gero, ez zitzaion askorik kostatzen burla egiten ziotenean bost axola zitzaion planta egitea. Liburua berriro uzteko eskatu zion Lindari. Zenbat eta mutil koxkorrek gehiago kantatu eta gehiago seinalatu atzamarrez, hainbat eta gogotsuago irakurtzen zuen. Laster ikasi zuen hitz guztiak irakurtzen. Bai eta luzeenak ere. Baina, zer esan nahi ote zuten? Lindari galdetu zion. Baina honek erantzun ahal zionean ere, ez zuen askorik konprenitzen. Eta gehienetan okerrago, zeren Lindak berak ere ez baitziezaiokeen erantzun.

—Zer dira gai kimikoak? —galdetzen zuen Johnek.

—O!, hor dituk magnesio gatzak eta alkohola, Deltak eta Epsilonak txiki eta kaxkar kontserbatzeko, karbonato kaltzikoa hezurretarako eta beste zenbait horrelakotsu.

—Baina nola egiten dira gai kimikoak, Linda? Nondik ateratzen dira?

—Ez zekiat, bada. Fraskoetatik atera ohi dituk. Eta fraskoak hustutzean, Kimika Biltegira gehiagoren bila. Kimika Biltegiko jendeak egiten dituztelakoan negok. Edo akaso fabrikara joango dituk bila. Ez zekiat. Nik ez nian horretan lan egiten. Nik enbrioien ardura neukaan.

Eta kontu berdina beti, edozer galdetzean. Lindak, antza, apenas zekien deusik. Herriko zaharrek erantzun askoz zuhurragoak eman ohi zituzten.

«Gizonen eta izaki guztien hazia, eguzkiaren hazia, eta lurreko hazia eta zeruko hazia, hauek oro Awonawilo-

nak eginak dira Laino Ernaltzailetik. Munduak lau sabel dauzka; eta Awonawilonak lau sabelotatik beherengoan gorde zituen haziak, eta haziok poliki-poliki ernez joan ziren...»

Egun batez (Johnek geroago kalkulatu zuenez, hamabi urte egin berri zituela gertatu zen) etxera itzultzean, ordurarte inoiz ikusia ez zuen liburu bat aurkitu zuen logelako zoluan. Liburu lodi-lodia zen eta zahar-zaharra ematen zuen. Arratoiek erdi janda zituen azalak, eta orriren batzuk solterik eta zimurrik ageri zitzaizkion. Hartu zuen Johnek eta azala begiratu zuen. Liburuaren titulua: *William Shakespeareren Lan Osoak.*

Linda ohean zetzan, meskal kiratsua katilutik edanez.

—Popék ekarria duk —esan zuen. Ahots totelez eta lakarrez mintzo zen, bere ahotsa ez balitz bezala—. Antilopeen Kivaren kutxa handi batean zegoan. Seguru asko ehundaka urte zeramaan bertan. Hala delakoan negok, zeren begiratu bat eman baitiot eta tontakeriak besterik ez baitakar. Zibilizatu gabeko autorea noski. Hala ere irakur praktikak egiteko balioko ahal dik.

Beste zurrut bat egin, katilua hustu, lurrean, ohe alboan utzi, buelta erdi eman, zotin bat edo bi egin eta loak hartu zuen.

Johnek itsuan ireki zuen liburua:

*Ezer ez;*
*etzangu lizuneko izerditza mingotsean bizi bakarrik,*
*ustelkerian egosita,*
*eztiketan eta maiteketan,*
*kamaina zikinaren gainean...*

Hitz sorgin haiek murmuriaka sartu zitzaizkion buruan, trumoiaren hotsa bezala; udako dantzetako danborrak bezala, danborrek hizketan balekite. Gizonek abesten

duten Arto-Kanta bezala, ederraren ederraz negar eragitekoa. Mitsima zaharraren hitz magikoak bezala bere lumei buruz, bere makila landuei eta bere hezur eta harri zatiei buruz: *kiathla tsilu, silokwe silokwe silokwe. Kiai silu silu, tsithl.* Baina Mitsimaren formula magikoak baino ere hobeki, zeren liburu hau *berari* mintzo baitzitzaion; miragarriro, erdizka bakarrik konprenigarri, magia ikaragarri ederrez mintzo zitzaion Lindaz; han, katilua hutsik ohe alboan, zurrunka zetzan Lindaz mintzo zitzaion; Lindaz eta Popéz, Lindaz eta Popéz mintzo zitzaion.

Johnek gero eta gorrotoago zuen Popé. Badezake gizon batek irribarrerik franko egin eta bilau izan. Arrenkurarik gabeko bilau, traidore, oilo, krudel. Zer esan nahi ote zuten zehazki hitz hauek? Johnek erdizka bakarrik zekien. Nolanahi ere, magia indartsua zuten, eta hitz haiek burmuinean durundaka zerraizkion eta bazirudien inoiz ordura arte ez zuela benetan gorroto izan Popé; inoiz benetan gorroto izan ez balu bezala, zeren ez baitzen inoiz izan zenbat gorroto zuen adierazteko kapaz. Baina orain hitz hauexek zituen Johnek, danborren, kantuen, formula magikoen antzeko hitz hauexek. Hitzok, berauek hartu zitueneko istorioak berak (ez zuen harentzat bat ere zentzurik, baina hala ere miragarria, miragarrai zen) Popéri gorrotoa izateko motibo bat ematen zioten; harenganako gorrotoa egiazkoago bihurtzen zuten; Popé bera errealago egiten zuten.

Egun batez, olgetan ibili ondoren John etxera bihurtu zen batez, barruko gelako atea zabalik aurkitu zuen; han zeutzan biak ohean, lo: Linda zuria eta Popé beltza alboan, beso bat haren bizkarren azpitik eta bestea haren bular gainean, bere ile-motots beltza Lindaren lepo zuriaren gainean, ito nahi zukeen sugetzar baten antzera. Lurrean,

ohapean, Popéren kalabaza eta katilu bat. Linda zurrungaka zegoen.

Johnek bihotza galdu zitzaiola nabari zuen, hutsunea geraturik haren lekuan. Bai, hutsik sentitu zen. Hutsik eta hotzik, eta ondoezik eta zorabiatu samar. Hormaren kontra jarri zen pixka bat zuzpertzeko. Arrenkurarik gabeko bilau, traidore, oilo... Danborrak bezala, artoari kantan ari zaizkion gizonak bezala, formula magikoak bezala, hitzak bueltaka zebilzkion buruan. Hasierako hoztasunetik bapateko berotasunera pasa zen John. Masailak odolak erretzen zituen, gela zalantzaka eta lausoturik zekusan. Hortzak karraskatu zituen. «Hilko dut, hilko dut, hilko dut...» esaka hasi zen. Eta kolpera hitz hauek etorri:

*Horditurik lo datzanean, edo sumindurik dadinean*
*edo oheko intzestu gisako atsegina...*

Magia bere alde zeukan, magiak azaldu eta agindu egiten zuen. John itzuli zen kanpoko gelara. «Horditurik lo datzanean...» Haragia ebakitzeko ganibeta lurrean zegoen, sutondoan. Johnek hartu eta behatzen puntan, barrurantz abiatu zen berriro. «Horditurik lo datzanean; horditurik lo datzanean...» Korrika pasa zuen gela alderik alde eta zasta sartu zion ganibeta. «O!, odola!» behin eta bigarrenez, Popé bere lo sakonetik itzartzen ari zen bitartean. Jaso zuen berriro zastakatzeko asmoz, baina norbaitek eskuturretik oratu eta «ai, ai!» bihurtu egin zion. Johnek ez zeukan mugitzerik. Harrapatuta zegoen. Han ikusi zituen Popéren begitxo beltzak, beregandik hurbil-hurbil, berari begira-begira. Johnek begiak aldendu zituen. Popéren ezkerreko bizkarrean bi zastada ageri ziren. «O!, odola, odola —Linda oihuka— odola!» Egundo ezin izan zuen odolaren ikusterik sufritu. Popék beste eskua jaso zuen... «garbituko nau» pentsatu zuen Johnek. Jarri zen

tinko kolpeari eusteko. Baina eskuak kokotsetik oratu, burua altxarazi eta Popéri bekoz beko begirarazi zion. Luzaro, orduak eta orduak. Eta honetan —ezin eutsi gehiago— Johnek negarrari ekin zion. Eta Popék barreari. «Hoa, hoa —esan zuen indieraz— hoa, ene Ahaiyuta kementsu». Eta John beste gelara abiatu zen korrika, negar malkoak estaltzera.

—Badituk hamabost urte —esan zuen Mitsima zaharrak indieraz—. Buztina lantzen irakatsi behar diat.

Elkarrekin lan egiten zuten, biak kokoriko erreka alboan.

—Lehenengo —esan zuen Mitsimak buztin hezea esku artean harturik— ilargitxo bat egingo diagu.

Agureak buztin multzoa zapaldu zuen, disko itxura eman, eta gero hegalak jaso zizkion. Eta ilargia gopor bilakatu zen.

Astiro eta moldagaitz, Johnek agurearen mugimendu leunak imitatu zituen.

—Ilargi, gopor eta orain suge.

Mitsimak beste buztin zati bat hartu eta zilindro luze zauli bat egin zuen; gurpil itxura osoa eman arte tolestu eta gopor hegalen gainean jarri zuen.

—Gero beste suge bat, beste bat eta beste bat.

Gurpilez gurpil Mitsimak gorantz zeramatzan pitxarraren hegalak. Behetik estu, erdirantz zabalago eta berriro estu lepo aldean. Mitsimak leundu zuen buztina, xafladatxoak eman zizkion, lausengatu eta arraskatu zuen. Eta azkenez, han zuen esku artean Malpaiseko pitxar tipikoa, ez beltza, baizik zuri koipetsua eta oraindik biguna. Johnen pitxarra zetzan alboan, Mitsimak egindakoaren imita-

zio baldarra. Bi pitxarrak ikustean barre algara ederra jaurtiki zuen Johnek.

—Baina hurrengoa hobea izango da —esan zuen.

Eta beste buztin zati bat bustitzen hasi zen.

Landu, itxura eman, atzamarrak trebatuz eta indartuz zihoazkiola sentitu: hura zen gozamena, hura.

«A, B, C, D bitamina», kantatu zuen ahopetik, lan egin bitartean. «Koipea gibelean, bakailaoa itsasoan...»

Mitsimak ere kantatzen zuen: hartza hiltzearen kanta.

Egun osoan lan egin zuten; eta egun osoa pasa zuen zorionez gainezka.

—Datorren neguan —esan zuen Mitsima zaharrak— arkugintza irakatsiko diat.

John luzaro egon zen ate aurrean zain. Eta azkenez bukatu ziren barruko zeremoniak. Ireki zen atea eta atera ziren. Lehenengo Kothlu, eskuina luze, ukabila gogor itxirik, bitxi bikain bat gorderik balekar bezala. Kiakimé zetorren atzetik, eskuina luze honek ere eta ukabila itxirik. Isilik zihoazen, eta isilik ere haien atzetik anaiak, arrebak, gusuak eta jende nagusia.

Atera ziren herritik lautadan zehar. Amildegi ertzera iristean gelditu egin ziren, eguzkiaren sorgu alderantz begira. Kothluk ireki zuen ukabila. Eskukada bat arto irin zuri ikusi zitzaion. Kothluk hats egin zion, zenbait hitz misteriotsu esan eta eskukada irin zuria eguzki alderantz jaurtiki zuen. Kiakimék ere beste hainbeste egin zuen. Gero Kiakiméren aitak pauso bat aurrera eman, lumaz apainduriko otoitz makila bat jaso, otoitz luze bat esan eta berak ere makila jaurtiki zuen arto irina joan zen alderantz.

—Bukatu da —esan zuen ozenki Mitsima zaharrak—. Ezkondurik daude.

—Beno —zioen Lindak etxeranzkoan—, hauxe besterik ezin diat esan, ez dagoela hainbeste komeria antolatu beharrik halako huskeria baterako. Herri zibilizatuetan mutilak neskatxa desiatzen duenean, ez dik besterik... Baina nora hoa, John?

Johnek ez zion kasurik egin eta arinari ekin zion, urrunera, oso urrunera, bakarrik egon zitekeen lekura.

«Bukatu da» Mitsima zaharraren hitzak durundaka zebilzkion gogoan. «Bukatu da, bukatu da...»

Isil-isilik, urrun-urrunetik, baina bortxaz, etsipenez, esperantza apurrik ere gabe, Johnek maite-maite izan zuen Kiakimé. Eta orain horra bukatuta dena. Johnek hamasei urte zituen.

Ilargi betean anitz sekretu agerraraziko zen Antilopeen Kivan, anitz erritmo ezkutu dantzatuko zen. Mutil gazteak Kiara sartuko ziren eta gizondurik aterako bertatik. Ikaratuxe eta era batera irrikatzen zeuden denak.

Iritsi zen noizbait eguna. Eguzkia sartu zen eta ilargia atera. John ere besteekin batera joan zen. Kivako atarian zenbait gizon beltzaran zegoen zain. Esku-eskailera behera eta behera zihoan, argi gorrixka baten argipean. Lehenengoak hasita zeuden jaisten. Honetan gizonetariko bat aurreratu zen, oratu zion besotik eta koadrilatik kanpora atera zuen. Johnek nolabait aldegin zion eskuartetik eta han zen berriro lagunartean, bere lekuan. Bigarrenean, ordea, iletatik oratu eta kolpeka hasi zitzaion gizona.

—Hi ez, buruzuri hori!

—Hi ez, zakurkume hori! —hots egin zion beste gizon batek.

Mutilek barre egin zuten.

—Kanpora!

Johnek ez zuen oraindik koadrilatik irten nahi.

—Kanpora —hots egin zuten berriro ere gizonek.

Batek makurtu, harri bat hartu eta danba jaurtiki zion.

—Kanpora, kanpora, kanpora!

Hura zen harri zaparrada. Odola zeriola, ilunetarantz ihes egin zuen Johnek. Gorriz argituriko Kivatik beregainaino zetorren hango kantu hotsa. Azkenengo mutila jaitsia zen eskaileran behera. John bakarrik geratu zen.

Bakarrik, herritik kanpoan, lautada hartako zabaldi basamortu hartan. Ilargiaren argitara, haitzek hezur zuriak ziruditen. Han behean, haranean, koioteak uluka ilargipean. Atzaparkadek min zemaioten eta ebakietatik odola zerion oraindik. Baina ez zuen minez egiten negar, bakarrik zegoelako baizik, bera bakarrik jaurtiki zutelako haitzezko eta ilargiaren argizko mamutegi hartara. Amildegi ondoan eseri zen. Ilargia bere atzean zuen; beherantz begiratu zuen, lautadako itzal beltzerantz, Herioren itzal beltzetan. Pauso bat, saltotxo bat besterik ez zen behar... Bere esku eskuina ilargiaren argitara altxatu zuen. Eskuturreko ebakidurari odola zerion oraindik. Zenbait segundura tanta ilun, ia kolorge bat erortzen zen argi hil hartan. Tanta bat, beste tanta bat... Bihar, eta bihar, eta bihar...

Denbora, Heriotza eta Jainkoa aurkituak zituen.

—Bakarrik, beti bakarrik —zioen gazteak. Hitz hauek oihartzun larria sortarazi zuten Bernarden gogoan. Bakarrik, bakarrik...

—Neu ere bakarrik negok —esan zuen konfidantza bolada batean—. Izugarri bakarrik.

—Zu? —John harriturik zegoen—. Nik uste nuen Beste Munduan... Lindak beti esaten du han ez dagoela inor bakarrik.

Bernard gorri eta larri jarri zen.

—Aizak! —esan zuen hitz totelka eta behera begira—. Ni besteengandik diferente samarra naizelakoan negok. Inor deskuidoz diferenteki dekantatua izanez gero...

—Hori, hori! —baieztu zuen gazteak—. Diferente denak bakarrik egon behar du derrigorrez. Denek ostikoka erabiltzen dute. Ba al dakizu leku guztietatik jaurtiki nautela ni? Beste mutilak gaua pasatzera mendira zihoazenean, han nork bere animalia sakratuaz amets egitera, niri ez zidaten besteekin batera joaten utzi; ez zidaten beren sekretuetatik batto ere agertu. Baina nik neure kasa egin nuen dena —gaineratu zuen—. Bost egun pasa nuen ezertxo ere jan gabe eta gau batez neu bakarrik joan nintzen mendi haietara.

Bernardek irribarre egin zuen amoltsuki.

—Eta egin al huen ametsik? —galdetu zion.

Besteak baietz buruz.

—Baina ez dizut esango zer amets egin nuen. —Isilik egon zen apur batean eta gero motel-motelki jarraitu zuen—: Behin beste inork egin ez duena egin nuen. Udako eguerdi batez, haitz baten kontrara egon nintzen, besoak zabalik, Jesus gurutzean bezalaxe.

—Baina, zergatik egin huen hori?

—Gurutzean josita egoteak zer sentiarazten duen jakin nahi nuen. Zintzilik han, eguzkiaren azpian...

—Baina, zergatik?

—Zergatik? Ba... —dudan egon zen—. Egin beharra sentitzen nuelako. Jesusek jasan ahal izan bazuen... Gai-

nera ezer txarrik egin duenak... Bestalde ni ez nintzen zoriontsu; eta horra beste arrazoi bat.

—Lehen begiratuan, zoritxarra erremediatzeko modu xelebrea duk hori —esan zuen Bernardek.

Baina hobeto pentsatuz gero, ondorio hau atera zuen: zena zela, bazela zerbait. Beharbada soma hartzea baino hobe...

—Handik lasterrera konortea galdu nuen —esan zuen gazteak—. Ahoz behera erori nintzen. Ikusten al duzu egin nuen ebakiaren seinalea?

Bekokia estaltzen zion ile-xerlo beilegia jasorik, han ageri zitzaion zauri-hatz zurbil bat eskuineko lokian.

Bernardek begiratu egin zuen eta gero, ikaratxo baten ondoren, begiak handik apartatu zituen. Bere egokimenduak are delikatuago egina zuen urrikibera baino. Gaixotasun edo zaurien aipamenik txikiena bera ere ez zuen ikaragarri bakarrik, bai eta nazkagarri eta, batez ere, atsekabetsu. Zikinkeria, desformatzeak edo zahartzea bezalaxe. Gero beste kontu batera jo zuen agudo.

—Gustatuko al litzaiake Londresera joatea gurekin? —galdetu zuen. Kanpaina bateko lehen pausoa zen hau. Eta kanpaina hartarako estrategia aspaldi zerabilen hausnarka bere baitan, etxetxo haren barruan gazte basati haren «aita» nor zen igarri zuenez geroztik—. Gustatuko al litzaiake?

Mutilari argi-argi jarri zitzaion aurpegia.

—Benetan al diozu?

—Bai horixe; baimenik lortzen badut, jakina.

—Eta Linda ere bai?

—Ba...

Bernard dudan zegoen. Emakume nazkagarri hura! Ez, inola ere ez. Edo, edo... Honetan Bernardi buruak

eman zion, Lindari zerion nazka huraxe gerta zekiokeela hain zuzen, egundoko garaipena.

—Ba, jakina baietz! —hots egin zuen, bere lehengo dudak bihotz zabaltasun gehiegiz konpondu nahiez.

—Pentsatzea ere nire bizitza guztiko ametsa egia bihur daitekeela! Gogoratzen al zara Mirandak esaten duenaz?

—Nor da Miranda?

Baina bistan zegoen gazteak ez ziola galdera hau entzun.

—*O, miraria!* —zioen.

Begiak argi eta aurpegia gori zeuzkan.

—*Zenbat gizakume on diren hemen! Zeinen gizateria ederra!*

Aurpegia are gorriago eta goriago jarri zitzaion. John Leninarengan pentsatzen zegoen, botilaren kolore berde likitsuz jantziriko aingeru harengan, gaztetasuna eta usain goxoa zerion aingeru mardul irribarretsu harengan:

—*O, mundu berri bitxia!* —hasi zen. Baina kolpera geratu zen; odolak ihes egin zion masailetatik; papera bezain zuri zegoen—. Berarekin ezkondurik al zaude? —galdetu zuen.

—Zer nagoen?

—Ezkondurik. Konprenitzen? Betiko. Indioek horixe esaten dute beren hizkuntzaz: «Betiko». Hauts ez daitekeen lokarria.

—O, ez horixe, Forden amodioarren!

Bernardek ezin izan zion barreari eutsi.

Johnek ere barre egin zuen, baina beste zerbaitegatik. Pozaren pozez egin zuen barre.

—*O, mundu berri bitxia!* —esan zuen berriro—. *O, mundu berri bitxia!, halako gizakumeak dituena!* Ekin diezaiogun agudo!

—Batzuetan txit xelebre mintzo haiz gero —esan zuen Bernardek, harriduraz eta zalantzaz begiratzen ziola—. Gainera, ez al litzaiake hobe mundu berri hori nolakoa den ikusi arte itxarotea?

# BEDERATZIGARREN KAPITULUA

Egun absurdo eta nazkagarri haren ondoren, Leninak uste zuen bazuela oporraldi on bat hartzeko eskubide. Ostatura bihurtzeaz batera, gramo erdiko sei soma garau hartu zituen, etzan zen ohean, eta handik hamar minutura ilargiko betierera bidean zen. Hamazortzi ordu beharko zituen gutxienez errealitatera itzultzeko.

Bitartean Bernard pentsakor eta begiak zabalik zetzan ilunetan. Gauerdia baino askozaz geroago hartu zuen loak. Baina logaldu hura ez zitzaion alferreko izan: plan bat zeukan.

Biharamun goizean, hamarrak puntu-puntuan, uniforme berdedun mestizoa jaitsi zen helikopterotik. Bernard zain zegokion pistan.

—Miss Crowne soma oporretan duk —azaldu zuen—. Bostak aurretik ez dik bueltan etortzerik. Zazpi ordu ditugu, beraz, libre.

Bazuten astia Santa Fera hegan egitekoak egin eta berriro Malpaisen egoteko, Lenina iratzarri baino askozaz lehenago.

—Seguru al dago gero hemen bera bakarrik? —galdetu zuen.

—Helikopeteroan bezain segur —lasaitarazi zuen mestizoak.

Igo ziren aparailura eta berehalaxe gora. Hamarrak eta hogeita hamalauan lurrartu zuten Santa Feko Posta Bulegoko azotean. Hamarrak eta hogeita hamazazpirako Bernardek lortua zuen komunikatzea Munduko Inspektorearen despatxuarekin, Whitehall-en. Hamarrak eta hogeita hemeretzian laugarren idazkari pribatuarekin hizketan ari zen. Hamarrak eta berrogeita lauan istorio berdina berziotsan lehenengo idazkariari, eta hamarrak eta berrogeita zazpi t'erdian Mustafa Mond berberaren ahots astun ozena zetorkion belarrietara.

—Berorren Fordtasunak —hitz-totelka Bernardek— interes zientifikorik aski duen zertzat joko duela pentsatzen ausartu naiz.

—Hala duk, bai, interes zientifikorik aski duen zertzat jotzen diat, noski —esan zuen ahots sakonak—. Ekar itzak heurekin Londresera bi indibiduo horiek.

—Betorren Fordtasunak jakingo du aparteko baimena behar dudala...

—Oraintxe berton —esan zuen Mustafa Mondek— helduko zaizkiok beharrezko aginduak erreserbazainari. Hoa agudo Erreserbazainaren bulegora. Egunon, Mr. Marx.

Isilune bat ondoren. Bernardek aurikularra eskegi eta azoteara igo zen korrika.

—Erreserbazainaren bulegora —esan zion berdez jantziriko Gamma mestizoari.

Hamarrak eta berrogeita hamalau minututan Bernard bostekoa emanez ari zitzaion Erreserbazainari.

—Atsegin handia, Mr. Marx, atsegin handia —orroa egin zuen honek adeitasunez—. Jaso berri ditugu agindu bereziak…

—Badakit —esan zuen Bernardek etenaraziz—. Lehentxoago bere fordtasunarekin telefonoz hitz egin dut —Bere tonu aspertuak bere fordtasunarekin egunero-egunero hitz egiteko ohitura zuela ematen zuen aditzera. Aulki batean eseri zen—. Mesedez, ardura zaitez prestakizun guztiez ahalik arinen. Ahalik arinen —errepikatu zuen. Bene-benetan dibertitzen ari zen.

Hamaikak eta hiru minututan bazeuzkan beharrezko agiri guztiak patrikan.

—Agur —esan zion nagusitasunez Erreserbazainari, honek ate altxakorretaraino lagundu baitzuen—. Agur.

Ostatura itzuli ondoren, dutxa hartu, bibro-masaia, bizar-kentze elektrolitikoa, goizeko albisteak entzun, ordu erdi batez telebista ikusi, bazkaria patxada osoz jan, eta ordu bi t'erdietan Malpaisera hegan egin zuen mestizoarekin.

Gaztea ostatu aurrean zegoen.

—Bernard! —dei egin zuen— Bernard!

Ez zuen erantzunik hartu.

Orein larruzko bere abarkekin isil-isilik ibiliz, eskaileran gora korrika igo eta atea zabaltzen saiatu zen. Baina itxita zegoen.

Aldegina zen! Bizitza guztian gertatu zitzaionik ikaragarriena zen hura. Neskatxak ikustera etortzeko inbitazioa egin zion, eta hara han joanak zirela. Johnek maila batean eseri eta negarrari eman zion.

Ordu erdi geroago leihotik begiradatxo bat botatzea bururatu zitzaion. Maleta berde bat ikusi zuen lehenengo,

L.C. inizialak estalkian pintaturik zituena. Sua bezala piztu zitzaion poza barruan. Hartu zuen harri bat. Kristal hautsia zalapartaka erori zen lurrera. Gerotxoago gela barruan zen John. Ireki zuen maleta berdea; eta berehalaxe aurkitu zuen usnan Leninaren lurrina, haren esentziaz birikiak betetzen zitzaizkiola. Bihotza taupadaka eta taupadaka ari zitzaion. Mementu batez konortea ere galtzeko zorian egon zen. Gero kutxa bitxi haren gainera makurturik, ukitu, argitara jaso eta aztertu zuen. Buruhauste gehixeago zemaioten lehenengoetan lika-panazko beste galtza motz haietako kremailerek. Baina laster asmatu zuen, eta hura zoramena orduan. Blist! eta blast!, blist! eta blast! Zorabiaturik zebilen. Haren zapatila berdeak bizitza guztian ikusitako gauzarik ederrena ziren. Barruko galtzatxo pare bat zabaldu zuen, baina gorri-gorri jarririk, berehalaxe gorde zuen berriro. Hala ere azetato lurrintsuzko zapi bati mun eman eta bufanda bat ipini zuen lepo bueltan. Kutxa bat irekirik, lurrin hautsezko laino bat jaso zuen. Eskuak irineztaturik geratu zitzaizkion. Bularrean, bizkarrean eta beso biluzietan astindu eta garbitu zituen. Bai lurrin zoragarria! Begiak itxi eta papoei igurtzi bat eman zien bere beso hautseztatuez. Azal fina sentitzen zuen aurpegiaren kontra, hauts goxoen usaina sudurrean... bertan zen bera!

—Lenina! —hots egin zuen kontuz-kontuz—. Lenina!

Zarata batek ikaraturik, buelta eman zuen errudun sentituz. Gorde zuen azkar asko maletan handik aterata zeukan guztia eta itxi zion estalkia. Jarri zen adi berriro, begiak zabal-zabalik begira. Inoren arrastorik ere ez; hotsik ere ez. Eta, hala ere, ziur zegoen zerbait entzun zuela, hasperen moduko zerbait, edo ohol kirrizkada halako zer-

bait. Behatz puntetan hurreratu zen aterantz, eta kontuz-kontuz irekirik, pasilu luze baten aurrez aurkitu zen. Pasiluaren beste ertzean beste ate bat erdi zabalik. Hurreratu bertara, sakatu eta burua agertu zuen.

Han, ohe zapal batean, izara oinetara kendua, pieza bakarreko pijama laburrez jantzia, han zetzan Lenina, lo gogorrean. Hain eder bere ile kizkurren artean, hain haur eta hunkigarri bere larrosazko behaztxoez eta loak bilduriko bere aurpegi mazalez, hain fidagarri bere eskutxo gurien eta gorputz-atal laxoen ahultasunez. Begiak malkoztu zitzaizkion Johni.

Katua txorien zelatan baino kontuzago —baina hainbeste kontu ez zen batere beharrezko, zeren pistola danbadaz izan ezik ez zegoen Lenina bere soma oporretatik itzularazterik izendaturiko ordu aurretik—, sartu zen John gelan, belaunikatu lurrean, ohe alboan, begiratu, eskuak batu eta ezpainak mugitu zitzaizkion.

—*Haren begiak* —marmartu zuen,

*Haren begiak, haren ilea, haren masaila, haren ibilkera, haren ahotsa,*
*zeure mintzoan hain malguak. O!, esku hori,*
*zeinen ondoan zuri guztiak euren buruari gedar*
*idazten duten tinta baitira; zeinen ikutze leunaren*
*ondoan latz baitirudi zisnekumeen lumatxak.*

Euli bat zebilen furrundaka Leninaren inguruan; Johnek uxatu zuen.

—*Euliak* —oroitu zen.

*Geldi zaitezte ene Julietaren eskuaren mirari zurian,*
*eta ostu grazia hilezkorra haren ezpainetatik,*
*zeintzuk, euren bestal apaltasun garbiaren garbiz,*
*euren pekatuez lotsatzen baitira.*

Kontuz-kontuz, txori ikarati eta agian badaezpadakoa lausengatzen doanaren keinu zalantzakorrez, esku bat luzatu zuen Johnek. Zintzilik eduki zuen, dar-dar, Leninaren atzamar geldietatik bi zentimetrora, ia ukituz. Ausartuko ote zen? Ausartuko ote zen *hain esku doilorrez profanatzera hain...?*. Ez, ez zen ausartu. Txori arriskutsuegia zen noski. Atzeratu eta bertan behera erori zitzaion eskua. Bai ederra zela Lenina! Bai ederra!

Honetan, bapatean, zer pentsatuko eta kremailerari lepo parean oratu eta kolpe batez goitik beheraino tiratzekotan egon zen. Begiak itxi eta burua indartsu astindu zuen, zakurrak uretatik ateratzean belarriak astintzen dituen bezala. Zein pentsamendu zakarra! Bere buruaz lotsaturik geratu zen John. «Bestal apaltasun garbiaren garbiz.»

Furrunda bat entzun zuen airean. Beste euliren bat ote zetorren, bada, grazia hilezkorra xurgatzera? Liztorren bat akaso? Johnek ingurura begiratu, baina ez zuen ezer ikusi. Furrunda gorantz zihoan, eta laster konturatu zen kanpotik zetorrela. Helikopteroa! Beldur ikaraz, Johnek ijuti egin, beste gelara korrika abiatu, zabalik zegoen leihotik saltatu eta pita arteko bide-zidorrean gora, garaiz iritsi zen Bernard Marx errezibitzera, hau helikopterotik jaisten ari zenean.

# HAMARGARREN KAPITULUA

Bloomsburyko Guneko lau mila geletako lau mila erloju elektrikoen orratzek ordu biak eta hogeita zazpi minutu seinalatzen zituzten. «Erlauntza trebe» hura —zuzendariari deitzea atsegin zitzaionez— jo eta su ari zen lanean. Denak lanpeturik, dena ordenuz mugituz. Mikroskopioen pean, beren buztan luzeak amorrazioz dantzatuz, espermatozooak buruz aurrera sartzen ziren obuloen barrura. Ernalduz gero, obuloak hazten eta zatikatzen ari ziren, edo —bokanowskytuak— kimuak botatzen eta enbrioi populazio osoak sortarazten zituzten. Predestinatze Sozialeko Gelatik amaigabeko zintak zihoazen sotora, eta han behean, erdi itzal gorrixka hartan, bero-berorik, beren peritoneozko burkoan egosiak eta odol artifizialez eta hormonaz aseak, fetoak hazten ari ziren, edo pozoiturik, ahulduz zihoazen geroko Epsilonak bihurtu arte. Furrunda isilez, alasa mugikorrak ziri-zara arrastatzen ziren Dekantatze Gelarantz: hemen haur ontzitik atera berriek lehen hasperena jaurtikitzen zuten ikaraz eta sorpresaz.

Azpisotoan dinamoek intzirika eta azentsoreek gora eta behera ziharduten. Haurtegietako hamaika solairuetan bazkalordua zen. Arreta handiz etiketaturiko mila eta zortzirehun haurrek xurga eta xurga ziharduten denek batera mila eta zortzirehun biberoietatik, nork bere litro erdi kanpoko sekrezio pasteurizatu hartuz.

Gorago, logelatzat zerabiltzaten hurrengo hamar solairuetan, bi sexuetako haurtxoak zeuden, txikiegiak oraindik siesta behar izateko. Hala ere, mundu guztia bezain lanpeturik zebiltzan, nahiz eta ezjakinean. Ikasgai hipnopedikoak oharkabez aditzen ari ziren: higiene eta soziabilitatea, klaseen kontzientzia eta bizimodu erotikoa. Eta gorago oraindik jolasgelak zeuden. Euri eguna zelako, han zebiltzan jolasean bederatzirehun haur hazitxo. Behin adreiluak edo buztina lantzen ari ziren, behin kukuka edo joko erotiko arruntetan.

Furrunnnn...! Erlauntza furrundaka, lanean, alai. Alaiak ziren, bai, neskatxak kantatzen ari ziren kantak, entseiu tutuen gainera makurturik! Predestinatzaileek txistuka ziharduten lan egin bitartean. Dekantamenduko Gelan txiste bikainik ere kontatzen zioten elkarri, frasko hutsen gainetik. Baina zuzendariak, Ernaltze Gelan Henry Fosterrekin sartzean, begitarte astuna, garratza eta harrizkoa zekarren.

—Eskarmentu publikoa behar dik! —zioen—. Eta Gela honetantxe gainera, zeren hementxe baitago Guneko inon baino goi-kastako langile gehiago. Bertora etortzeko esan zioat ordu bi t'erdietarako.

—Bere egitekoa bapo betetzen du behintzat —esan zuen Henryk, zabaltasun hipokritaz.

—Bazekiat. Arrazoi bat gehiago alde, gogor egin diezaiodan. Adimen handikoa izateari bere erantzukizun mo-

ralak dagozkio. Gizon batek zenbat eta talentu handiago eduki, hainbat eta ahalmen gehiago dik inor hondatzeko. Eta hobe duk baten sufrimendua, askoren hondamendia baino. Azter itzak gauzak hotzean Mr. Foster, eta aise kargutuko haiz ez dagoela krimen okerragorik portaera heterodoxoa baino. Hiltzaileak indibiduoa bakarrik hil ohi dik, eta kontuak kontu, zer da indibiduo bat? —Eta besoak zabaldurik, mikroskopio erreskadak, entseiu tutuak eta inkubailuak seinalatu zituen—. Aise fabrika zezakeagu beste berri bat; geuk nahi adina. Heterodoxiak, ordea, indibiduo baten bizia baino zerbait inportanteagoa mehatxatzen dik. Gizartea bera mehatxatzen dik. Bai, gizartea bera —esan zuen berriro—. Baina hemen zetorrek bera.

Bernard gelan sartu eta hurbilduz zetorren ernalgailuen ilada artetik. Harroxko eta bere buruarengan konfidantzatsu agertu arren, nekez estal zezakeen barruko larritasuna. «Egunon, zuzendari jauna» esan zuen gogor eta absurdoki ozen. Gero, ordea, bere okerra zuzendu nahiez, barregarriro motel esan zuen: «Hona etortzeko eskatu zenidan hitz egin diezadazun».

—Bai, Mr. Marx —esan zuen gailenki zuzendariak—, ikustera etor henkidala eskatu nian. Bart itzuli omen haiz oporretatik bueltan.

—Bai —erantzun zuen Bernardek.

—Baaaaai —a bokala idi-orroa bezala luzatuz. Gero kolpera ahotsa gogorturik, hots egin zuen—: jaun-andreok, jaun-andreok.

Berehalaxe bukatu zen neskatxen kantaketa beren entseiu tutuen gainean eta mikroskopiolarien txistuketa. Isilaldi handia egin zen. Denak erdirantz bueltatu ziren.

—Jaun-andreok —ekin zion berriro zuzendariak—. Barka iezadazue zuei lanak geldiaraztea. Eginkizun latzak

behartzen nau horretara. Gizarteko segurtasun eta egonkortasuna arriskuan ditugu. Arriskuan, bai, jaun-andreok. Gizon honek —eta Bernard seinalatu zuen salati—, zuen aurrean duzuen gizon honek, hainbeste eman zaion, eta, beraz, hainbeste eman behar lukeen Alfa-Gehiago honek, zuen lankide duzuen, edo hobeki esateko, zuen lankide zenuten honek, traizio doilorra egin dio beragan ezarri genuen konfidantzari. Kirolaz eta somaz iritzi heretikoak ditu, bizimodu sexualean heterodoxia nabarmena darama, ez du nahi Gure Fordek irakatsiak obeditu eta lan orduetatik kanpo «haur bat bere fraskoan bezala» portatu —eta puntu honetara iristean T seinalea egin zuen zuzendariak—. Beraz, hona hemen, jaun-andreok, gizartearen etsai bat, hona hemen Ordenuaren eta Egonkortasunaren kontrako elementu subertsibo bat, hona hemen Zibilizazioaren beraren azpijale bat. Hauek honela direla, kanpora jaurtikitzea erabaki dut, eta lotsagarriro jaurtiki ere, Gune honetan orain arte izan duen kargutik. Eta halaber erabaki dut Azpigunerik bajuenera bidal dezatela eskatzea; eta ahalik urrunen edozein populazio inportantetatik, honen zigorra ahalik onuragarrien izan dakion gizarteari. Islandian ez du aukera handirik izango bere antifordkeriaz inor hondatzeko. —Zuzendariak eten egin zuen. Gero besoak uztarturik, Bernardengana itzuli zen handikiro—. Marx —esan zuen—, ager al dezakek arrazoirik ezarri diadan zigor hau ez dezadan indarrean jarri?

—Bai, badezaket —erantzun zuen Bernardek gogorki.

—Esak, bada, zein —esan zuen harrituxe zuzendariak, baina bere duintasunari zegokion maiestatea galtzeke.

—Esan ezezik, erakutsi egingo dut. Baina pasiluan dago. Egon pixka batean. —Bernard hurreratu zen agudo atera eta brasta ireki zuen—. Aurrera —agindu zuen.

Eta eskaturiko «Arrazoia» han agertu zen denen bistan.

Ikara sartu zitzaien denei, arnasa ere kolpera etenik. Marmarketan hasi ziren gero harriduraz eta higuinez. Neskatxa gazte batek txilio bat jaurtiki zuen. Aulki baten gainean zegoen hobeto ikusteko, eta zalantza egitean, bi entseiu tutu bota zituen espermatozooz beteak. Puzturik eta hanpaturik, gorputz gazte eta irmo haien artetik, edade ertaineko, mamutzar harrigarri bat zetorren: Linda sartu zen gelan, lakrikun eran irribarre hautsi eta kolorgea erakutsiz, ibiltzeaz batera ondulazio lizun ustekoz bere hankatzarrak biribilkatuz. Bernard beraren alboan zetorren.

—Hemen duzu —esan zuen Bernardek, zuzendaria seinalatuz.

—Ez nuela ezagutuko uste al zenuen? —galdetu zion haserrez Lindak Bernardi. Gero zuzendariarengana itzulirik—. Jakina, bada, ezagutzen zaitudala, Tomakin. Edonon ezagutuko zintudan, bai eta mila pertsona artean ere. Zuk, ordea, ahazturik naukazu beharbada. Ez al zara gogoratzen? Ezetz, Tomakin? Zeure Linda nauzu bada. —Lindak burua zeharka begiratzen zion, irribarrez oraindik. Baina zuzendaria hain harri eta mutur-garratz ikustean, konfidantza galduz zihoan apurka, lehenengo irribarre hura zeharo itzali arte—. Ez al zara nitaz oroitzen, Tomakin? —esan zuen berriro Lindak ahots dardartiz. Aurpegi puztu hura are itsusiago jarri zen, oinaze biziko zeinu batez—. Tomakin!

Lindak besoak zabaldu zizkion. Batzuk barrezka hasi ziren ahopetik.

—Zertara dator —hasi zen zuzendaria— hain…?

—Tomakin!

Linda aurrerantz abiatu zen bere atorra zaharra tatarrez, besoak zuzendariaren lepora jaurtiki eta aurpegia haren bularrean ezkutatu zuen. Ez ziren barre-algara makalak sortu jendartean.

—Zertara dator hain txantxa nazkagarria? —hots egin zuen zuzendariak.

Aurpegia gorri eta gori zuela, ahal guztiak egin zituen hain hertsiki besarkaturik zegokion emakumea askatzeko.

—Baina Linda nauzu, Linda! —Barre-algarak baretu ziren—. Ume bat egin zenidan! —hots egin zuen Lindak, barre-hotsaren gainetik.

Isilune latza egin zen kolpera. Denak harrituta. Begiak nora ezik zebiltzan batetik bestera, norantz begiratu ez zekitela. Zuzendaria zurbil geratu zen bapatean, amore eman zuen, eta eskuak Lindaren eskuturretan zituela oraindik bekoz beko begira geratu zitzaion, izuturik.

—Bai, ume bat… eta neu izan ninduen ama.

Lindak desafio bezala jaurtiki zuen lizunkeria hura, isiltasun zital hartan. Brasta apartatu zitzaion, lotsa-lotsa eginik, eta aurpegia esku artean gorde zuen, negarrez.

—Ez zen nire errua izan, Tomakin. Nik beti egin nituen ariketak, ez al da egia? Ez al da egia? Beti… Ez dakit nola… Bazeneki Tomakin, zein lazgarria… Hala eta guztiz ere haur hura kontsolagarri izan zitzaidan. —Eta atera bihurturik dei egin zuen—: John!

John berehalaxe sartu zen. Atalburuan geldialditxoa egin, ingurura begiratu, eta gero, bere orein larruzko abar-

kekin isil abiaturik, belauniko erori zen zuzendariaren oinetan eta ozenki esan zuen:

—Aita!

Hitz honek, hitz honen zikinkeria barregarriak pixka bat laxotu zuen ia eutsi ere ezineko tentsio hura. (Izan ere «Aita» hitza —umegintzaren okerkeria moralaz zerikusi zuzenik ez zuenez gero—, ez zen lizun, baizik zakar; lotsagabekeria pornografikoa ez baina eskatologikoa zen). Barre-algarek berriro leher egin zuten, burrunbatsu, ia histeriko, elkarren atzean, inoiz amaituko ez balira bezala. AITA! Nor eta zuzendaria! AITA! O Ford! Entzuteko ere halakorik! Barrea barrearen gain, aurpegiak ia desintegratzeko zorian, eta begiak ere malkoa zeriela. Espermatozooz beteriko beste sei entseiu tutu hankaz gora joan ziren. AITA!

Zurbil-zurbil, begiak sumindurik, zuzendariak bere ingurura begiratu zuen irainak eta nahasturak eraginda.

AITA! Barre-algarak itzaliz zihoazelakoan, inoiz baino gogorrago leher egin zuten. Zuzendariak esku artean aurpegia gorde eta korrika aldegin zuen gelatik.

# HAMAIKAGARREN KAPITULUA

Ernaltze Gelan gertatua gertatu ondoren, goi kastetako Londrestar guztiak irrikitzen zeuden Inkubatze eta Egokitze zuzendariaren aurrean belaunikatu zen mutil bikain hura ikusteko —zuzendari baino hobeto zuzendari ohia, zeren berehalaxe dimititu baitzuen gizagaixoak eta harrez gero ez zen sekula gehiago Gunean agertu—. Handiena, berriz, mutil hark «Aita» deitu ziola (txiste politegia, noski, egia izateko).

Lindak, ordea, ez zuen batere estimaziorik. Inork ez zeukan Linda ikusteko gogorik txikienik. Ama zela esatea txistea baino askoz okerragoa zen: lizunkeria garbia. Gainera Linda ez zen basati jatorra. Frasko batean inkubatua eta egokitua izan zen beste guztien moduan; ez zezakeen, beraz, ideia xelebreegirik eduki. Azkenez —eta hauxe zen jendeak Linda gaixoa ikusi nahi ez izateko arrazoirik gogorrena—, bere gorpuzkeraren kontua zegoen. Lodi-lodia zen. Gaztetasuna galdua zeukan. Hortzak alferrik galdurik zituen eta aurpegia puzturik. Hura tankera modua! O Ford! Ez zegoen hari begiratzerik larrialdirik, benetako

larrialdirik sentitzeke. Pertsona zentzudunek erabaki sendoa zeukaten Linda ez ikusteko. Lindak ere bere aldetik, ez zeukan inor ikusteko gogorik. Zibilizaziora bihurtzea somara bihurtzea izan zen harentzat, ohean etzanda egon ahal izatea, eta nahi adina bakazio hartzea, baina buruko minik edo goragalerik gabe; peyotl hartu ondoren sentitzen zuenik sentitu gabe: sekula bururik ez jasotzeko moduko zerbait lotsagarri eta antisoziala egin balu bezala. Somak ez zuen halako oste txarrik uzten.

Somazko oporrak bete-beteak ziren. Eta inoiz biharamun goizak gozagaitz gertatzen baziren ere, bezperako gozoaren konparazioagatik zen bakarrik. Honek, ordea, erremedio ona zeukan: oporraldia luzatu. Egundo ase ezinez, gero eta dosi gehiago eta sarriago eskatzen zuen Lindak. Lehenengoetan Shaw doktoreak eragozpenak jartzen zizkion. Baina gero berak nahi adina soma eman zion. Egunean hogeiraino gramo hartzen zuen inoiz Lindak.

—Martxa honetan hilabete edo bi barru, bereak egin dik —agertu zion doktoreak Bernardi—. Usterik gutxienean arnasagunea elbarrituko zaio: ez dik gehiago arnasarik hartuko. Kitto. Eta ez zeritzoat hain gaizki ere. Gaztetu ahal baldin bagenu, beste kontu bat huke. Baina ez zezakeagu.

Harritzeko zena denen ustez (zeren somaren mende zegoen bitartean ez baitzuen Lindak arazorik ematen) Johnek eragozpenak jartzen zituela.

—Baina ez ote diozu bizialdia laburtzen gero horrenbeste soma emanez?

—Alde batetik bai —aitortu zuen Shaw doktoreak—. Baina bestetik luzatu ere egiten zioagu.

Gaztea begira-begira zegokion ezer konprenitzeke.

—Somak bizitza tenporaleko urte batzuk ken zitzakek —azaldu zuen doktoreak—. Baina pentsa ezak zer iraupen luze eta amaigabea eman dezakeen denboratik kanpo. Somazko oporraldi bakoitza gure arbasoek «betikotasun» zeritzatena bezalatsu duk.

John bazihoan zerbait konprenituz.

—*Betikotasuna geure ezpain eta begietan genuen* —marmartu zuen.

—Zer?

—Ezer ez.

—Nolanahi ere, jakina —jarraitu zuen Shaw doktorea—, ezin diagu permititu jendeak noiznahi betikotasunera aldegin dezan, hemen lan inportanterik egiteko duen bitartean. Baina Lindak lan inportanterik egiteko ez duenez gero...

—Hala ere —ekion zion Johnek—, ez zait bidezko iruditzen.

Doktoreak bizkarrak uzkurtu zituen.

—Beno, egun osoa eroak bezala txilioka pasa dezan nahiago baldin baduk...

Azkenerako Johnek amore eman behar izan zuen. Lindak eskatu adina soma izan zuen. Aurrerantzean Bernarden apartamentu etxeko hogeita hamazazpigarren solairuko gelatxo batean eduki zuten, ohean, irratia eta telebista martxan etengabe, patxuli grifoa tantaka eta soma garauak esku-mende zituela. Han zegoen, eta, hala ere, ez zegoen guztiz han. Kanpoan zegoen beti, oso urrun, oporretan. Oporretan beste mundu batean: mundu hura irratiko musika kolore ozenezko laberintoa zen, laberinto irristakor, pilpiragarria, zeinak (derrigorrezko bihurgune ederretan zehar) segurtasun osoko leku distiratsura baitzeraman. Mundu hartan telebistako irudi dantzariak sentso-

rama kantatu eta ezin aktore bikainagoak ziren. Mundu hartan lurrin huts baino gehiago zen tantaka ari zen patxulia: eguzkiak, milioi bat sexofoi, Popé amodioa egiten; eta askoz gehiago oraindik, askoz eta askoz gehiago, neurri gabe gehiago…

—Ez, ez zeukeagu birgaztetzerik. Baina txit pozgarri zaidak aukera hau edukitzea, gizakume baten zahartzea nolakoa den ikusteko —bukatu zuen Shaw doktoreak—. Eskerrik asko deitzeagatik.

Eta gogor estutu zuen Bernarden eskua.

John zen, beraz, denek ikusi nahi zutena. Eta John, Bernard bere zaindari ofizialaren bidez ikusia izan zitekeenez bakar-bakarrik, hara non, lehenengoz bere bizitza guztian, Benard normalki ez ezik, garrantzi handiko pertsonatzat tratatzen zuten.

Inork ez zuen jadanik bere odol artifizialeko alkoholik aipatzen, inork ez zion txantxarik eta burlarik egiten bere tankera fisikoari. Henry Foster inoiz baino lagunago agertzen zitzaion; Benito Hooverrek sei pakete sex-hormonazko txikle oparitu zizkion; Predestinapen Laguntzaileak etorri eta bere burua gonbidatu zuen, ia-ia maltzurkeriaz, Bernarden festetako batera. Eta emakumeei zegokienez, aierurik txikienari erne egon baizik ez zuen behar Bernardek, eta zein gogoko izan, hura eduki zezakeen beretzat.

—Datorren asteazkenean Basatia ikustera joateko gonbidatu nain Bernardek —esan zuen harro Fannyk.

—Pozten naun —esan zuen Leninak—. Eta orain aitor ezan oker hengoela Bernardi buruz. Ez al zain txit atsegina iruditzen?

Fannyk baietz buruaz.

—Eta aitortu beharra dinat —gaineratu zuen— oso sorpresa atsegina hartu nuela.

Enbasatzaile Nagusia, Predestinapen Zuzendaria, hiru Ernaltze Komisari Orde, Emozio Ingeniaritza Eskolako Sentsorama Irakaslea, Westminster Barrutiko Abesbatzako Dekanoa, Bokanowskypen Inspektorea... Amaigabea zen Bernardengana maiz jotzen zuten jaunen zerrenda.

—Eta joan den astean sei neskatxa erabili dizkiat —agertu zion Bernardek Helmholtz Watsoni—. Bat astelehenean, bi asteartean, beste bi ostiralean eta bat larunbatean. Eta astirik edo gogorik izan baldin banu, beste dozena bat ere bahuen gutxienez desiratzen zegoena.

Helmholtzek hain isiltasun lehorrez eta gaitzeslez entzun zizkion harrokeria hauek, non Bernard mindu egin baitzen.

—Inbidia didak hik —esan zuen.

Helmholtzek ukatu egin zion buruz.

—Ez, baina oso triste negok; horixe duk guztia —erantzun zuen.

Bernardek haserreturik aldegin zion.

—Helmholtzi ez zioat gehiago inoiz hitzik egingo —esan zuen berekiko.

Egunak aurrera zihoazen. Bururaino igota zeukan bere garaipena. Eta garaipen honek (beste edozein mozkorgarrik egingo zukeen bezala) ia zeharo adiskidetu zuen ordurarte hain latz zeritzan mundu harekin. Bera gizon inportantetzat jotzen zutenez geroztik, gauzen ordenua bapo zegoen. Baina garaipenak mundu harekin adiskidetu zuelarik ere, Bernardek ez zuen ordenu hura kritikatzeko pribilegioa galdu nahi. Zeren kritika hau egiteak bere buruaren garrantzia bizikiago sentiarazten baitzion, handiago zela sentiarazten baitzion. Gainera, benetan uste zuen bazegoela egon ere zer kritikaturik. (Era batera, galtzak betean zebilen bere garaipenaz eta nahi adina neskatxa lortu

ahal izateaz) Basatiarenganako gogoagatik lausenguka zebilzkionen aurrean, Bernardek heterodoxia nazkagarria azaltzen zuen. Kortesiaz aditzen zioten denek. Baina ostean buruari eragiten zioten, esanez: «Gazte honek gaizki bukatu behar dik». Eta ziurtasun handiz jaurtikitzen zuten profezia hau, zeren beren aldetik ahal guztiak egitekotan baitzeuden, bete zedin. «Nekez aurkituko dik bigarrenez salba dezan Basatirik», esaten zuten. Baina oraingoz han zegoen lehenengo Basatia eta merezi zuen Bernard kortesiaz tratatzea.

—Airea bera baino xumeago —esan zuen Bernardek gorantz seinalaturik. Perla bat zeruan zintzilik bezala, han zegoen goian, oso goian, Meteorologi Saileko globo gatibua, eguzkiaren argipean distiraka.

«... Bizimodu zibilizatuko alderdi guztiak erakutsi behar zaizkio Basatiari» zioten Bernarden instrukzioek.

Mementu hartan begirada panoramiko bat erakusten ari zitzaion Charing T Dorreko plataformatik. Estazioko nagusia eta txandako meteorologoa zituzten gidari. Baina Bernardek egiten zuen ia hitzik gehien. Horditurik bezala, Mundu Inspektorea zela ematen zuen gutxienez... Airea bera baino xumeago.

Bonbaytiko Suziri Berdea erori zen zerutik behera. Bidaiariak jaitsi ziren. Zortzi drabidiar biki ide, kaki kolorez jantziak, kabinako zortzi leihoskatan agertu ziren: kamareroak.

—Mila berrehun eta berrogeita hamar kilometro orduko —esan zuen handikiro Geltokiko Nagusiak—. Zer deritzak, Mr. Basati?

Johnek ederki zeritzan.

—Hala ere —esan zuen— Arielek berrogei minututan gerriko bat lurrari jarri ahal izan zion.

«Harritzekoa da —idatzi zuen Bernardek Mustafa Mondentzako txostenean— harridurarik edo ikararik gutxi agertzen duela Basatiak Zibilizazioko aurrerapenen aurrez. Dudarik gabe honen arrazoi zati bat da gauza guzti hauen berri maiz entzun ziola Linda deritzan emakume horri, bere am…

Mustafak betosko latza jarri zuen. «Hitz hau osorik idatzita ezin ikusteko bezain geldotzat jotzen al nau tenteltzar horrek?»

«Eta bestetik berak "arima" deritzan zer horretan daukalako bere axola guztia. "Arima" hori inguru fisikotik arras independente omen da. Honegatik jakinarazi nionean…»

Hurrengo esaldiak gainetik pasa zituen Inspektoreak, eta zerbait interesgarriagorik eta konkretuagorik bilatu nahiez, orria bueltatzera zihoanean, haren begiek honako esaldi sorta txit nabarmenarekin topo egin zuten: «… nahiz eta aitortu beharra dudan —irakurri zuen— Basatiarekin ados nagoela haurkeria zibilizatu hau errazegitzat edo, berak dioenez, ez hain nekezkotzat jotzean; eta aukera hau aprobetxaturik, oharrarazten diot Berorren Fordtasunari...»

Honekin Mustafa Mond haserretik umore onera pasa zen ia kolpera. Izan ere, barregarri zen gizagaixo hura nori eta berari lekzio handiak ematen hastea ordenu sozialari buruz. Burutik egina zegoen nonbait. «Eskarmentu on bat eman behar zioat», esan zuen bere baitan. Gero burua atzerantz bota eta barre-algara galanta jaurtiki zuen. Nolanahi ere, ordukoz behintzat, eskarmentuak ez zeukan presa handirik.

Helikopteroentzako tailer txikitxo bat zen, Ekipo Elektrikoen Konpainiako sukurtsala. Azotean bertan errezibitu zituzten (Inspektorearen gomendiozko gutunak eragin magikoa baitzuen) Nagusi Teknikoak eta Giza Baliabideen Zuzendariak. Jaitsi ziren tailerrera.

—Fabrikaldi bakoitza —azaldu zuen Giza Baliabideen Zuzendariak—, ahal dela behintzat, Bokanowsky sail bakar bati egokitzen zaio.

Han ari ziren larogeita hiru Delta buruzapal, beltz eta ia sudurmotz, hotzean inprimatzen. Gengibre koloreko berrogeita hamasei Gamma sudurmakok maneiatzen zituzten mandrildun eta launa taratuludun berrogeita hamasei tornuak. Fundizioan ehun eta zazpi Epsilon senegaldar ari ziren lanean, beroari eusteko apropos egokiturik zeudenak. Torloju mozketan ari ziren hogeita hamahiru Delta eme, buru-luzexka, beilegi, pelbis estudun, eta denak metro eta hirurogeita bederatzi zentimetro luze, hogei milimetroko aldea zutela gehienez. Muntaia gelan Gamma-Gehiago ipotxen bi sail dinamo montatzen ari ziren. Lanerako bi mahai luzeak elkarren aurrez aurre zeuden. Bien artetik arrastatzen zen pieza bakanez kargaturiko zinta amaigabea. Berrogeita zazpi buru beilegi erreskadan beste berrogeita zazpi buru beltzaranen aurrez aurre... Berrogeita zazpi sudurmotz beste berrogeita zazpi sudurluzeren aurrez aurre. Berrogeita zazpi kokots-zapal beste berrogeita zazpi kokots-zorrotzen aurrez aurre... Aparailuak, montatuak izan ondoren, hamazortzi neskatxa idek aztertzen zituzten, denak ile gaztaina kizkurdunak eta Gammen kolore berdez jantziak. Berrogeita lau Delta-Gutxiago hanka-labur eta ezkertik paketatzen zituzten otzaretan, eta hirurogeita hiru Epsilon erdi ipotx, be-

turdin, ilegorri eta pekaztok kargatzen kamioi eta gurdietan.

—*O, mundu berri bitxia...!*

Bere oroimenaren txantxa batez, Mirandaren hitzak esaten hasi zen Basatia:

—*O, mundu berri bitxia!, halako gizakumeak dituena!*

—Eta zaude ziur —bukatu zuen Giza Baliabideen Zuzendariak, lantegietatik irtetean— apenas daukagula problemarik gure langileekin. Beti dago...

Baina honetan, Basatia kolpera aldendua zen bere lagunengandik eta okadaka zebilen ereinotz hesi baten ostean, lur firmea helikoptero bat balitz bezala airezko batxe batean.

«Basatiak —idazten zuen Bernardek— ez du somarik hartu nahi, eta badirudi oso atsekabeturik dagoela Linda, haren am..., etengabeko oporretan dagoelako. Ohargarria da, bestetik, haren am...ren zahartzea eta itxura higuingarria gorabehera, Basatia sarritan doala ikustera eta harekin oso lotuta agertzen dela —oso adibide interesgarria berau, egokitze goiztiar batek joera naturalak nola alda eta bestetaraz ditzakeen ikusteko (kasu partikular honetan atsekabe batetik aldentzeko joera).

Etonen Goimailako Eskolako azotean lurrartu zuten. Eskolako Patioaz bestalde, Lupton Dorreko berrogeita hamabi solairuak distiraka zeuden eguzkipean. Ezker-eskuinetan Unibertsitatea eta Eskolako Kantoria Komunala zeuden, beren zementu armatuzko eta «vita-dristalezko» multzo galantak gorantz jasotzen zituztelarik. Lau angeludun barrutiaren erdian Gure Forden altzairu kromatuzko antzinako estatua bitxi bat zegoen.

Gaffney doktoreak, Prebosteak eta Miss Keate Maistra Nagusiak errezibitu zituzten aparailutik jaistean.

—Biki asko al daukazue hemen? —galdetu zuen Basatiak, inspekzio jira hastean, lehen ere eskarmentaturik baitzegoen.

—O, ez! —erantzun zuen Prebosteak—. Klaserik gorenetako neska-mutilentzat bakarrik da Eton. Obulo bat, adulto bat. Honela, jakina, irakaskintza zail gertatzen da. Baina ikasle hauek ardura handiak hartzera eta ezusteko gorabeherei aurrea ematera destinaturik daudenez gero, ez dago beste erremediorik.

Eta arnasa hartu zuen.

Bernard, bitartean, bazebilen Miss Keate konkista nahiez.

—Astelehen, asteazken edo ostiral gauren batez libre baldin bazaude —ziotsan— etor zintezke ene etxera. —Eta erpuruaz Basatia seinalaturik, gaineratu zuen—: Morrosko xelebrea duzu oso. Txit nabarmena.

Miss Keatek irribarre egin zuen (eta irribarre hura ezin xarmangarriago iruditu zitzaion Bernardi).

—Eskerrik asko —esan zuen—. Bai pozik ere joango naizela zure festa batera.

Prebosteak atea ireki zuen. Alfa-Bikoitz-Gehiagoen gelan egindako bost minutuek txunditurik utzi zuten John.

—Zer da erlatibitate elementala? —galdetu zion ahopetik Johnek.

Bernard saiatu zitzaion esplikatzen, baina, iritzia aldaturik, beste ikasgela batera joatea proposatu zuen.

Beta-Gutxiagoen Geografia gelara zeraman pasiluko ate ostetik, soprano ahots ozen batek honela zioen:

—Bat, bi, hiru, lau. —Eta gero nekez eta haserrez—: Berriro lehen bezala.

—Ariketa Malthustarrak —azaldu zuen Maistra Nagusiak—. Neskatxarik gehienak neutroak ditugu. Neu ere halakoa naiz —Bernardi irribarre egin zion—. Baina baditugu zortzirehun bat neskatxa agorgabe ere, eta hauek etengabeko ariketak behar dituzte.

Beta-Gutxiagoen Geografia gelan, hona zer entzun zuen Johnek: «Basatien Erreserba —hango baldintza klimatiko eta geologiko txarrengatik edo berezko ondasunik ezagatik— zibilizatzerik merezi izan ez duen tokia dela». Klaskadatxo bat eta gela ilunpetan geratu zen. Irakaslearen buru gaineko pantailan, Acomako *Penitenteak* ageri ziren Ama Birjinaren aurrean belauniko, intzirika, Johnek lehenago entzunak zituen bezala, beren bekatuak aitortuz, Jesus gurutzatuaren edo Pukongen arranoaren irudiaren aurrean. Etongo gazteak barrezka ari ziren. Intzirika oraindik, Penitenteak zutitu, gerriraino biluztu eta korapilozko zartailuez beren buruak azotatzen hasi ziren. Barre-karkara handiagorik jaurtiki zuten orduan Penitenteen intziriak itotzeraino.

—Baina zergatik egiten dute barre? —galdetu zuen Basatiak mindurik eta harriturik era batera.

—Zergatik? —Prebosteak bihurtu zuen aurpegia bereganantz, oraindik barre lasaia zeriola—. Zergatik? Ba... guztiz barregarria delako.

Erdi itzal zinematografiko hura aprobetxatuz, Bernard zirri bat egitera menturatu zen, lehenago, ilunik ilunenean ere, sekula ausartuko ez zena. Bere oraingo garrantziaz fidaturik, Maistra Nagusiari gerri bueltatik pasa zion besoa. Gerriak amore eman zuen, sahatsa bezala tolesturik. Bernard bazihoakion musu bat edo bi ematera, edo agian ximiko bat egitera, baina berriro piztu ziren argiak.

—Hobe dugu beharbada, aurrera egin —esan zuen Miss Keatek. Eta aterantz jo zuen.

Geroxeago Prebosteak esan zuen:

—Hona hemen kontrol hipnopedikoko gela.

Ehundaka musika sintetikoko tresna, logela bakoitzerako bana, erreskadan zeuden alasatan jarrita gelako hiru hormatan. Laugarren horman pista ozeneko erroiluak sartzeko zuloak zeuden, eta erroilu haietantxe inprimatzen ziren ikasgai hipnopedikoak.

—Aski da erroilua hementxe sartzea —Gaffney doktoreari hitza kendurik— botoi honexeri sakatu…

—Horri ez, beste honi baino —zuzendu zuen Prebosteak ernegaturik.

—Edo beste honi, berdin da. Erroilua bilakatu egiten da. Selenio zelulek uhin ozen bihurtzen dituzte argi zirradak eta…

—Eta kitto —bukatu zuen Gaffney doktoreak.

—Shakespeare irakurtzen al dute? —galdetu zuen Basatiak, laborategi kimikoetarantz zihoazela Eskolako Liburutegi aurretik pasatzean.

—Ez, ba —esan zuen Lotsaz Maistra Nagusiak.

—Gure Liburutegian —azaldu zuen Gaffney doktoreak— kontsulta liburuak besterik ez dago. Gure gazteek dibertsiorik nahi baldin badute, sentsoramara joatea daukate. Ez ditugu inola ere animatzen bakarreko dibertsioei ekitera.

Bost autobuskada neska-mutil, kantari denak edo isilki besarkatuak, albotik pasa zitzaizkien beirazko pistan zehar.

—Slougheko Erretegitik bueltan datoz —azaldu zuen Gaffney doktoreak. Bitartean, Bernard Maistra Nagusiarekin gauerako zita jartzen ari zen isilka-misilka. Herio-

tzarako egokipena hamazortzigarren hilean hasten da. Haur guztiek astean bi goiz ematen dituzte Hilgaien Ospitalean. Ospitale hauetan jostailurik onenak dituzte, eta inoren hil egunetan txokolate izotza ematen zaie. Honela heriotza zerik arruntena bezala hartzen ikasten dute.

—Beste edozein prozedura fisiologiko bezala —esan zuen Maistra Nagusiak aire profesionalez.

Konforme geratu ziren: zortzietan Savoyn.

Londresetik bueltan Brentfordeko Telebista Konpainiako fabrikan gelditu ziren.

—Nahi al duk hementxe zain egon telefonora noan bitartean? —galdetu zuen Bernardek. Basatia zain egon zen inguru guztira so eta so. Mementu hartantxe uzten zuen bere lanaldia Eguneko Txanda Nagusiak. Behe kastako langile pila bat txanda zaintzen zegoen errailbakarraren estazioan: zazpirehun edo zortzirehun Gamma, Delta eta Epsilon, andre eta gizon, denen artean dozena bat aurpegi eta estatura diferente zutela bakarrik. Bakoitzari txartelaz batera pilula kutxatxo bana ematen zion kobratzaileak. Gizonezko eta andrezko ehunzango luzea aurreraka zihoan geldiro-geldiro.

*«Veneziako Merkataria»*z oroiturik, Basatiak hau galdetu zion Bernardi, berriro etorri zenean:

—Zer dago kutxatxo horietan?

—Euneroko soma zatia —erantzun zuen Bernardek erdi nahasirik, zeren mementu hartantxe baitzegoen Benito Hooverrek emandako gomazko pastila bat mastikatzen—. Eguneroko lanaldia bukatzean ematen zaie. Gramo erdiko launa garau. Eta seina larunbatetan.

Johni besotik oratu zion amoltsuki eta honela, biak batera, helikopterorantz abiatu ziren.

Lenina kantari sartu zen Aldagelan.

—Poz eztitan hagoela zirudin —esan zion Fannyk.

—Egongo ez naun, ba —erantzun zuen Leninak. Dzast!—. Bernardek deitu zidan duela ordu erdi. —Dzast! Dzast! Erantzi zituen galtza motzak. Dzast!— Ezusteko konpromezu bat zeukan. —Dzast!—. Ea gau honetan Basatia sentsoramara eramango nukeen galdetu zidan. Azkar ibili beharra dinat.

Eta bainurantz joan zen korrika.

«Zortedun neskatxa» esan zuen Fannyk urruntzen ikusiz.

Ez zegoen batere inbidiarik aipamen hartan; Fanny, bere ontasunean, egia bat konstatatzen besterik ez zen ari. Leninak zortea zuen; zortea, bai, Bernardekin batera Basatiaren ospe apart hura erdi banatua zuelako; zortea, bere garrantzirik gabeko pertsonan eguneko moda nagusia isladatzen zuelako. Ez al zuen gonbidatu bada Fordtar Gazteen Elkarteko Idazkarigoak bere inpresioez hitzaldi bat ematera? Ez al zen gonbidatua izan Aphroditœum Clubeko urteroko bazkarira? Ez al zen bada jadanik agertu Zentzutoneko Albistegian, alegia, ikusgarri, entzungarri eta ukigarri agertu planeta guztian zehar hamaikatxo milioi ikusleren aurrean?

Inspektorearen Munduko Bigarren Idazkariak afaltzera eta gosaltzera gonbidatu zuen. Leninak Bere Fordtasun Epaile Gorenarekin pasa zuen asteburu bat eta Canterburyko Artxitxantrearekin beste bat. Barruko eta Kanpoko Sekrezio Konpainiako Buruzagiak etengabe deitzen zion telefonoz, eta Lenina Deauvillera ere joana zen Europako Bankuko Gobernari Komisarioarekin.

—Ederra dun hau benetan. Hala eta guztiz ere —aitortu zion Leninak Fannri— zerbait lortu eta trukean ezer emango ez banu bezala ematen zidan barruak. Zeren denek aurren jakin nahi dutena baita nolakoa den Basati baten amodiogintza. Eta nik ez dakidala esan behar. —Leninak buruari eragin zion—. Gehienek, jakina, ez zidaten sinesten. Baina egi-egia dun. Tamalez! —gaineratu zuen tristerik eta hasperenka—. Mutil ederragorik! Ez al da egia?

—Baina, ez al hatzaio gustatzen, bada? —galdetu zuen Fannyk.

—Inoiz baietzean egoten naun. Iheska zebilkidan beti. Ni gelara sartzen banatzaio, bera kanpora ateratzen zaidan. Ez nau ikutu ere nahi; ez zidan begiratu ere nahi. Batzuetan brasta itzultzen natzaion eta neuri begira-begira harrapatzen dinat, eta orduan... beno, badakin gizonek nola begiratzen duten gustatzen hatzaienean.

Fannyk bazekien, bai.

—Ez dinat konprenitzen —esan zuen Leninak.

Ez zuen, ez, konprenitzen, eta horrek nahasita ezezik, zeharo haserre zerabilen.

—Badakin, bada, Fanny: asko eta asko gustatzen zaidan.

Gero eta gustatzenago zitzaion. «Ea, bada, gaur dun aukera aparta» ziotsan bere buruari, bainu ondoren lurrinketan ziharduen bitartean. «Aukera aparta».

Pozaren pozez kantuari eman zion:

*Besarka nazazu amodioz horditzeraino,*
*musuka nazazu hiltzear uzteraino.*
*Besarka nazazu, maite, arrima zakizkit*
*Soma bezain ona baita amodioa.*

Lurrin organoa Belar Capriccio zoragarriki fresko bat jotzen ari zen, erlabelarrezko eta ispilikuzko, erromerozko eta albahakazko, mirtozko eta estragonezko arpegio kizkurrak; modulazio ausart multzo bat, matiz guztietatik, espezietatik anbar griseraino iragaten zirenak, gero, berriz ere sandalo, alkanfor, zedro eta belar moztu berrien usainez (ustekabeko diskorde ikutu arin eta leun batzuez: giltzurrun saltsazkoak eta zerri-korotzezko ia sugestio batez), pieza hasi zeneko lurrin xume haietara bihurtzeko. Erlabelarrezko azken lehertzea ezereztu egin zen; txaloak entzun ziren eta argiak piztu. Musika sintetikorako makinan soinu inprimatuzko erroilua bueltaka hasi zen. Hiperbiolin, superbiolontxelo eta sasi-oboerako hirukote batek airea bere ahultasun atseginez bete zuen. Hogeita hamar edo berrogei konpas, eta gero, hondo instrumental horren gainean gizagaineko baino gainekoagoa zen ahots bat txioka hasi zen; batzuetan eztarriz, batzuetan buruz, beste batzuetan txirula baten gisa, eta besteetan desioz beteriko armoniez kargatuta, Gaspar Fosterrek bajuz egindako markatik erraxki iragaten zen musikazko soinuen muga behereraino, saguzarraren txilioa bezalako txio bateraino, behin (1770ean Parmako Opera Dukalean, Mozarten harridurarako) Lucrezia Ajugarik, Historiak halakotzat gogoratzen duen kantari bakarrak, jaurtiki zuen *do* altuenetik baino askozaz ere gorago.

Beren aulki pneumatikoetan patxadan eseririk, Lenina eta Basatia usnatzen eta entzuten zeuden. Laster iritsi zen ikusteko eta ikutzeko mementua ere.

Argiak itzali ziren. Eta ilunetan suzko letrak agertu ziren, airean zintzilik ziruditela. *«Hiru aste helikopteroan» filme sentitzekoa, superkantatua, mintzo sintetikoz-*

*koa, kolorezkoa eta estereoskopikoa lurrin organoaren laguntza sinkronizatu eta guzti.*

—Atxiki zakizkie besaulki besoetako madari metalezko horiei —marmartu zuen Leninak—. Ez duzu bestela ikumen efekturik nabarituko.

Basatiak obeditu zion.

Bien bitartean suzko letrak aldendu ziren; ondoren hamar minutu egin zuten ilunpe osoan. Gero, kolpe-kolpera, itsugarri eta haragiz eta hezurrez agertu balira baino askozaz «errealago», errealitatea bera ere baino errealago, han agertu ziren besarkatuak beltz haunditzar baten eta neskatxa Beta-Gehiago beilegi eta buru biribil baten irudi estereoskopikoak.

Basatia ikarak hartu zuen. Hura zirrara ezpainetan sentitzen zuena! Esku bat ahora eraman zuen; kili-kiliak bukatu ziren. Ezkerra jarri zuen berriro metalezko madarian eta lehengo zirrara bera nabari berriro ere. Bitartean lurrin organoak almizkle hutsaren usaina hedatzen zuen. Ia azkenetan bezala, usotxo bat kurrunkaz ari zen pixta ozenean: O..., ooo...! Eta segunduko hogeita hamabi bibrazioan bakarrik, afrikar baxua baino ahots astunago batek erantzuten zuen: «A... Aaaaa! O, oooo! A... Aaaaa!» Ezpain estereoskopikoak berriro elkartu ziren, eta Alhambrako sei mila ikusleen aurpegiko alderdi erogenoak dardar jarri ziren ia jasan ezineko atsegin galbanikoz. «Oooo...!»

Filmearen argumentua guztiz sinplea zen. Lehenengo «Oooo-Aaaa!»-ketak bukatu eta minutu gutxira, duo bat entzun eta amodio eskena bat ikusi zen hartz larru famatu haren gainean, zeinaren ileak (Predestinatzaile Laguntzaileak arrazoi osoa zuen) bana-banaka senti zitezkeen. Beltzak helikoptero akzidente bat izan zuen eta buruz behera

zetorren. Plast! Hura bekokikoa! Aienerik franko jaurtiki zuen publikoak.

Plastada hark pikutara bota zituen beltzaren egokimendu guztiak. Mementu harrez gero itsurik eta erorik irrikatzen zegoen neskatxa Beta harenganako. Neskatxak atzera egiten zion. Berak, ordea, ekin eta ekin. Burrukak, korriketa, etsai bati erasoa, eta azkenez bahiketa berebiziko bat. Neskatxa Beta beilegia harrapatu eta airez aire zeraman. Hiru aste pasa behar izan zuen zeruan zintzilik, beltz ero harekin *«tête-à-tête»* guztiz antisozialean. Azkenez anitz abentura eta aireko akrobaziaren ondoren, hiru mutil Alfa gazte lerdenek askatzea lortu zuten. Adultoen Berregokitegi batera bidali zuten beltza eta pelikula ederki eta garbiro bukatu zen, neskatxa Beta Beilegia bere hiru salbatzaileen maitale bihurtua zelarik. Une batez eten egin zuten laukote sintetiko bat kantatzearren, super-orkestaren laguntza guztiaz eta organoaren gardeniazko lurrinez. Gero hartz larruzko alfonbra agertu zen azkenengoz eta, sexofoien zalaparta hotsean, azkenengo musu estereoskopikoa ilunetan galdu zen eta azkenengo dardara elektrikoa ezpainetan hil zen, azkenetan dagoen tximeleta baten azken dardarak bezala, gero eta ahulago, azkenez, behin betiko, tximeleta geldi geratu arte.

Leninarengan, ordea, tximeleta ez zen guztiz hila. Argiak piztu eta gero ere, jendetzaren artean, hankak arrastaka, azentsorerantz zihoazela, tximeletaren irudiak kili-kilika zerraion Leninari, larritasunezko eta atseginezko ildoak eginez zerraion bere barruan. Leninak Basatiari besotik oratu eta bularren kontrara estutu zion. Basatia begira egon zitzaion apur batean, zurbil, minbera, desioz beterik eta aldi berean desio hartaz lotsaturik. Ez, bera ez zen nor, ez…

Leninaren eta Basatiaren begiek elkar jo zuten mementu batean. Zenbat ondasun prometitzen zuten Leninaren begiek! Basatiak apartatu zituen bereak eta askatu zuen Leninak oraturik zeukan besoa.

—Uste dut ez zenukeela honelako gauzarik ikusi behar —esan zuen mutilak, inguruko zirkunstantziei ezartzen saiatuz Leninaren perfekzioaren lehengo edo geroko edozein hutsen edozein akats.

—Nolako gauzarik, John?

—Filme nazkagarri hori bezalakorik.

—Nazkagarria? —Lenina bihotzez harriturik zegoen—. Nik sekulakoa eritzi diot eta.

—Zatar hutsa —esan zuen Basatiak haserre sutan—. Lotsagabea.

—Ez dizut konprenitzen —erantzun zuen Leninak.

Zergatik ote zen hain arraroa? Zergatik saiatzen ote zen dena hankaz gora botatzen?

Taxikopteroan ia begiraturik ere ez zion egin Basatiak. Inoiz azaldu gabeko zin indartsuez loturik, aspaldi preskribatuta zeuden legeak obeditzen zituelarik, eserita zirauen, isil-isilik, aurpegia alborantz bueltatua. Noizik noizera, atzamar batek eten zorian dagoen kordel tentso bat pultsaturik bezala, gorputz osoa dardar hasten zitzaion bapateko ikara larrian.

Taxikopteroak Leninaren etxeko azotean lurrartu zuen. «Azkenean —pentsatu zuen neskak pozez gainezka, jaitsi zirenean—. Azkenean». Nahiz eta Basatia ordurarte txit aldrebes portatu zen. Farol baten azpian jarririk, Leninak esku-ispilu batean begiratu zuen bere burua. «Azkenean». Bai, sudurrak distiratxoa egiten zion. Borlatik eroritako hautsak astindu zituen. Basatiak taxia ordaindu bitartean, izango zuen dotore jartzeko denbora.

Leninak sudurra hautseztatu zuen, berekiko zioelarik: «Bai lerdena dela gero. Ez din Bernard bezain lotsor izan beharrik. Eta hala ere,... Beste edozeinek aspaldi egina zuen ia. Baina orain, azkenean...». Ispilutxo borobilean zekusan bere aurpegi zatiak iribarre egiten zion.

—Gabon —esan zion atzetik ahots ito batek.

Leninak buelta osoa eman zuen. Basatia zutik zegoen taxiko atean, berari adi-adi begira. Bistakoa zen so eta so egon zitzaiola bera hautseztatzen ari zen denbora guztian, zain —baina, zeren zain?— edo dudan, erabaki nahiez eta ezinez, pentsaketan, pentsaketan... Leninak ez ziezaiokeen antzik ere eman zer pentsamendu ote zerabilen.

—Gabon, Lenina —berriro ere Basatiak.

—Baina, John... Nik uste nuen... Nahi dut esan, ez al zatoz...?

Basatiak atea itxi eta aurrerantz makurtu zen pilotuari zerbait esateko. Taxikopteroak gorantz egin zuen. Aparailuaren azpiko leihoskatik beherantz begiraturik, Basatiak Leninaren aurpegia ikusi zuen, gorantz begira, zurbilik, farolen argi urdinera. Ahoa zabalik, deika zegokion. Haren irudia, perspektibak mendratua, urrunean galdu zitzaion. Azotea koadratuak, gero eta txikiago, ilunbezko ozeano batean hondatzen zela zirudien.

Bostgarren minutuan, Basatia bere gelan zegoen. Arratoiek jandako liburua bere zokotik atera, arreta erlijiotsuz haren orri lohi ximelak bueltatu eta Otelo irakurtzen hasi zen. Otelo ere beltza zen *«Hiru aste helikopteroan»* pelikulako protagonista bezala.

Begiak lehortuz, Leninak azotea zeharkatu zuen azentsoreraino. Hogeita seigarren pisuraino jaisten zen artean, soma tubo bat atera zuen. Ez zion gramo bakar bati

asko iritzi halako pena handia ordaintzeko. Baina bi hartuz gero biharamunean garaiz ez altxatzeko arriskua zuen. Diferentzia partiturik, ezker eskuaren ahurrean, berau katilu gisa jarrita, gramo erdiko hiru pilula ezarri zuen.

# HAMABIGARREN KAPITULUA

Bernard oihuka ari zitzaion, atea itxita baitzeukan; Basatiak, ordea, ez ziola ireki nahi.

—Denak berton zeudek, baina, hire zain!

—Itxaron dezatela! —erantzun zuen ahots motelez ate ostetik.

—Baina badakik ondo ere, John —zer zaila inor konbentzitzea oihuka hitz egin behar denean!— neuk gonbidatu ditudala, heu ezagutzearren gonbidatu ere.

—Lehenengo neuri galdetu behar zenidan ea ba al nuen haiek ezagutzeko gogorik.

—Orain arte beti etorri haiz, bada, John.

—Horrexegatik ez daukat berriro joateko gogorik.

—Niri poz ematearren behintzat —erregutu zuen Bernardek.

—Ez.

—Benetan al diok?

—Bai.

Bernardek, ia etsita, berriro ekin zion:

—Baina, zer egin behar dut orain nik?

—Hoa ifernura! —hots egin zuen amorrazioz gela barrutik.

—Baina gaur gauez Canterburyko Artxitxantrea etorri baita!

Bernardek gutxi behar zuen negarrez hasteko.

—*Ai yaa takwa!* —Basatiak zuñieraz bakarrik adieraz zezakeen egoki Canterburyko Artxitxantreaz pentsatzen zuena—. *Häni!* —gaineratu zuen, hobeto pentsatuz bezala; eta gero burlazko basakeriaz bukatu zuen—: *Sons éso tse-nà.* —Eta ttu egin zuen lurrean, Popék berak egingo zukeen bezala.

Azkenez, Bernardek alde egin behar izan zuen, buru-makur eta nahigabez, bere gelara. Basatia gau hartan ez zela etorriko abisatu behar, han zain zegoen jendeari. Notizia hura haserre bizitan hartu zuten. Gizonak sutan zeuden fama txarreko eta iritzi heretikoko tipo ziztrin hura kortesiaz tratatzera beharturik aurkitu zirelako. Zenbat eta maila goragokoak ziren hainbat eta begizko handiagoa zioten.

—Honelako zapokeria egitea niri! —zioen behin eta berriro Artxitxantreak—. Nori eta neuri!

Emakumeak, berriz, sumindurik zeuden nork eta gizontxo mengel hark engainatu zituelako, nork eta fraskoan norbaitek deskuidoz alkohola bota zion gizontxo hark, Gamma-Gutxiagoen gorpuzkeradun gizontxo hark. Laidogarri benetan, eta hala zioten denek gero eta gogorrago.

Lenina zen ezer esan ez zuen bakarra. Zurbilik, bere begi urdinak inoiz ez bezalako malenkoniaz lausoturik, eserita zegoen bazter batean, inguruan zirenetatik inork sentitzen ez zuen emozioak isolatuta.

Bozkario larrizko sentimendu estrainioz beterik joan zen jaialdira. «Minutu gutxi barru —zioen bere baitan ge-

lara sartzean— ikusiko dinat, mintzatuko natzaion, esango zionat (erabaki sendoa baitzeukan) gustatzen zaidala, mundu guztiko inor baino gehiago gustatzen zaidala. Eta berak orduan esango din beharbada…»

Zer ote lioke Basatiak? Leninari odolez beratu zitzaizkion masailak.

«Zergatik portatu ote zen hain modu estrainioz lehengo gauean? Bai arraro egon zela! Eta, hala ere, txit ziur negon gustatzen natzaiola. Ziur negon…».

Mementu hartan berri izugarria eman zuen Bernardek: Basatia ez zela jaialdira azalduko.

Leninak bapatean sentitu zituen Grina Bortitz Artifizialaren tratamendua hastean nabaritzen diren sentsazio guztiak: hustasun izugarria, larderia larria, goragalea. Bihotzak pot egin behar ziola sentitzen zuen.

—Beharbada ez nauela atsegin dun arrazoia —esan zuen bere golkorako. Eta bapatean, egiantzekoa egia zalantzaezin bihurtu zen: Johnek uko egin zion etortzeari, bera ez zuelako atsegin. Bera ez zuelako atsegin…

—Gogorra da izan ere —ziotsan Etongo Maistra Nagusiak Erretegiko eta Fosforo Hornitegiko zuzendariari—. Pentsatzea bakarrik ere noraino naizen…

—Bai —zioen Fanny Crowneren ahotsak—, alkohol kontu hori egia borobila da. Ezagutzen dut bat garai hartan Enbrioi Biltegian lan egiten zuen beste bat ezagutzen zuena. Honek neure lagunari esan zion eta nire lagunak neuri esan zidan…

—Penagarria, bai, penagarria benetan —zioen Henry Fosterrek Artxitxantreaz gupiturik—. Jakingarri izango zaizu beharbada gure zuzendari ohiak ia Islandiara bota zuela.

Bere muturretan esaten ari zirenen zastadek zulaturik, Bernarden autokonfidantzazko globo puztua hustuz zihoan mila zauritik. Zurbilik, leherturik, apaldurik eta lur jorik, Bernard hara eta hona zebilen bere gonbidatuen artean, ganora gabeko aitzakiak murduskatuz, hurrengoan Basatia etorriko zela aginduz, esertzeko erregutuz eta hartzeko karotinazko bokadilo bana, A Bitaminazko pate xerra bana edo kopa bana sasitxanpain. Gonbidatuek jan eta edan bapo, baina inork ez zion kasurik ere egiten. Gogor hartzen zuten edo beren artean gaizki esaka zebiltzan Bernardez, altu eta gordinki, bera bertan ez balego bezala.

—Eta orain, ene adiskideok —esan zuen Canterburyko Artxitxantreak bere ahots eder eta ozenez, Forden Eguneko ospakizunak zuzentzean ohi zuen ahotsez—, orain, ene adiskideok, uste dut badela ordua...

Zutitu, kopa utzi, afari eder hartako hondar-mondarrak lika gorrizko txalekotik astindu eta aterantz abiatu zen. Bernard aurrean jarri zitzaion, gerarazi nahiez.

—Benetan ere joan beharrean al zara, Artxitxantre jauna? Oraindik oso goiz baituzu. Nik espero nuen...

Bai horixe! Zenbat gauza espero izan zuen, Leninak ezkutuan esan zionetik Artxitxantreak onartuko zuela gonbidapena, bidaltzen baldin bazion! «Txit atsegina duzu». Eta T itxurako girtendun urrezko kremailera erakutsi zion Bernardi, Artxitxantreak Leninari oparitua, Elizbarrutiko Kantorian elkarrekin pasa zuten asteburuaren oroigarritzat. *«Canterburyko Artxitxantrea eta Basati jauna etorriko dira»*. Bernardek bere gonbidapen guztietan iragarri zuen garaipen hau. Baina Basatiak gau hura, gau huraxe hautatu behar bere gelan sartzeko eta *«Hàni»* deiadarka ibiltzeko, bai eta (eskerrak Bernardek ez zekien zuñieraz) *«Sons éso tse-nà»* ere. Bernarden karrera guztiko

gailur-une izateko zena, horra bere apalaldirik handien bihurtua.

—Banuen, ba, nik gogoa... —ekin zion Bernardek totel-motelka, erregu eta samin airez begiraturik jaun handi hari.

—Ene adiskide gazte —esan zuen Artxitxantreak laztasun gogorrez eta solemnez; denak isil-isilik geratu ziren. Atzamar bat astindu zion Bernardi—. Berandu izan aurretik, horra aholku on bat. —Ahotsa sepulkral bihurtu zitzaion— Zuzen hadi, ene lagun gazte, zuzen hadi.

Buru gainetik T seinalea egin, eta buelta erdia emanik:

—Lenina enetxo —esan zuen beste tonu batez— hator nirekin.

Guztiz esanekoa, baina irribarrerik gabe, eta (guztiz hotz, ematen zitzaion ohorearekiko) batere sutu gabe, Lenina gelatik irten zen haren atzetik. Beste gonbidatuek, errespetuzko bitarte baten ondoren, haiei jarraitu zieten. Azkenak atea kopez itxi zuen. Bernard bakarrik gelditu zen. Zeharo zulatuta, osorik despuzturik, aulki batean erori zen, eta aurpegia eskuez tapatuz, negarrez hasi zen. Minutu batzuk geroago erreakzionatu zuen baina, eta soma pilula batzuk hartu zituen.

Goian, bere gelan, Basatia *Romeo eta Julieta* irakurtzen ari zen.

Lenina eta Artxitxantrea Kantoriako azotean jautsi ziren.

—Zabiltza azkar, ene lagun gazte... nahi dut esan, Lenina —hots egin zion Artxitxantreak, egon ezinez, azentsoreko atetik.

Leninak, ilargiari begira geratu baitzen pixka batean, jaitsi zituen begiak eta korrika pasa zuen azotea bereganantz.

*«Biologiako Teoria Berria»*. Hauxe zen Mustafa Mondek irakurri berri zuen estudioaren titulua. Eserita jarraitu zuen apur batean pentsakor eta betoskoa zimur. Hartu zuen gero luma eta hauxe idatzi zuen azalean: «Autoreak xedearen kontzeptuaz egiten duen tratamendu matematikoa berria eta txit burutsua da, baina heretikoa eta, beraz, oraingo ordenu sozialari dagokionez, arriskutsu eta iraultza bide. *Debekatuta argitaratzea*». Azken hitz hauek azpimarratu egin zituen. «Autoreari kargu hartu beharra dago. Beharbada, Santa Helenako Itsas Estazio Biologikora eraman beharra gerta daiteke». Lastima galanta, pentsatu zuen sinatzean. Lan bikaina zen. Baina helburu gisa azalpenik onartzen hasiz gero… Batek zekien noraino hel zitekeen. Honelakoxe ideiak dira goiko kastetan hain gogorki moldaturik ez dauden buruak erraxkienik desegoki ditzaketenak, hauei Ontasun Nagusiaren zorionaz fedea galduarazi eta, beronen lekuan, helburua gizasemeon esfera honetatik haragoko beste edozein tokitan dagoela sinestaraziz; hots, bizitzaren xedea ez dela erosotasunaren mantentzea, kontzientziaren berrindartze eta lantze bat, jakintzaren gehitze bat baizik. Eta, beharbada —pentsatzen zuen berekiko Administrariak—, beharbada, egia da. Baina zirkunstantzia hauetan onartezina dugu. Luma bat hartu zuen berriro eta *Debekatuta argitaratzea* hitzen azpian marra berri bat egin zuen, lehengoa baino are lodiagoa; hasperen bat egin zuen: «Bai ederra litzatekeela bizitza, norberak zorionaren kargu hartu behar ez balu!».

Begiak itxirik eta aurpegia estasiaturik, John ezerezari errezitatzen ari zitzaion goxo-goxo:

*Berak dirakaskie zuziei distiratsu argi egiten!*
*Zintzilik dirudi gauaren masailean,*
*nola bitxi garesti bat etiopiarraren belarrian.*
*Bikainegia, noski, erabilia izan dadin*
*Ederregia lurrerako.*

Urrezko T zintzilik zegoen dizdiz Leninaren bularrean. Artxitxantreak, jokalari, oratu eta kontuz-kontuz tiratu zion. Isilaldi luzea urraturik, Leninak esan zuen:

—Hobe dudala uste dut gramo pare bat soma hartu.

Ordurako Bernard lo gogorrean zen, bere ametsetako paradisu partikularrari irribarrezka. Irribarrezka, irribarrezka. Baina hogeita hamar segundurik segundu, ohe buruko erloju elektrikoaren orratza aurrera zihoan urriki gabe: klik, klik, klik, klik. Eta iritsi zen biharamuna, eta Bernard bueltan zetorren berriro aldiko eta aldeko mixeria artera. Egokitegirantz lanera zihoala taxiz, oso umore txarra zeraman. Garaipenaren zorabioak erreka jo zion. Berriro ere berbera zen, lehengo-lehengoa. Eta azken asteetako baloi puztuarekin kontrastez, bere antzinako *«nia»* inguruko giroa baino askoz astunago zitzaion.

Basatia, batere uste gabe, txit adikor eta bihozbera agertu zitzaion Bernard lehertu hari.

—Malpaisen ezagutu nuen Bernarden antz gehiago duzu orain —esan zuen, Bernardek bere istorio zinkurinatia kontatu zionean—. Gogoratzen al zara hitz egin genuen lehengo hartaz? Etxetxo hartatik kanpoan. Orduantxe bezalakoa zara orain.

—Dohakabe naizelako berriro; horra zergatik.

—Tira, nahiago nuke nik dohakabe izan hemen duzuen zorion faltsu marro horretaz gozatu baino.

—Kaixo, bapo zegok hori! —esan zuen Bernardek saminez—. Eta heu den-denaren errudun! Nire jaialdira etorri nahi ez izatearren, denak kontra jarri zitzaizkidaan.

Bernardek bazekien zentzurik gabeko bidegabekeria esaten ari zena. Bere golkorako, bai eta kanporako ere, aise onartzen zuen Basatiak zioenaren egia, alegia, zein gutxi balio duten halako huskeriagatik hain etsai zorrotz bihur zitezkeen lagunek. Hala ere, guzti hau jakinik eta aitorturik ere, bere lagunaren kontsolamendua eta laguntza zitzaiolarik ere oraingo euskarri bakar, Bernardek bazerabilen barruan, benetako damuaz batera, Basatiaren kontrako azerikeria ezkuturik, eta etengabe ari zen haren kontrako mendekutxoak hariltzen. Artxitxantrearen kontra ezer asmatzea alferrikakoa zen; eta are alferrikakoagoa Enbasatzaile Nagusiaren edo Buruzagi Laguntzailearen kontra. Biktima bezala, Bernardentzat bazuen Basatiak beste inork ez bezalako alde on handi bat: zaurigarria zela, atzemangarria zela. Hauxe da izan ere gure lagunen eginkizunik aurrenetariko bat, alegia, gure etsaiei ezarri nahi eta ezin dizkiegun zigorrak sufri ditzatela (era leunagoz eta sinbolikoz).

Helmholtz zen Bernarden beste lagun-biktima. Bere gailur aroan bost axola zion honen adiskidantzak. Orain, ordea, hondaturik, berriro joan zitzaion adiskidantza eske. Eta Helmholtzek eman; eta gainera, eman zion kexu bat ere gabe, aipurik egiteke, bien artean inoiz haserrerik egon zenik ere ahaztua balu bezala. Hunkiturik, Bernard umiliaturik sentitzen zen era berean halako bihotz zabaltasunaz, berau are handiagoa, eta beraz umiliagarriagoa, somarik gabe, osotoro Helmholtzen izaerari zor zitzaiona

izanik. Eguneroko bizimoduko Helmholtz bera zen ahazten eta barkatzen zuena eta ez soma gramo erdiak ematen dituen oporretako Helmholtz. Bernard behar bezain esker oneko agertu zen (adiskide bat berriz topatzea kontsolamendu handia zen) eta batera behar bezain sumindurik (atsegin handia litzateke Helmholtzez, beronen bihotz zabaltasunagatik, mendekatzea).

Adiskidetu eta gero, lehenengoz elkar ikusi zutenean, Bernardek bere zoritxarraren historia guztia kontatu zion, eta haren kontsolamenduak hartu zituen. Geroztik egun gutxitara, ezustez eta bai lotsaz ere, jakin zuen ez zela bera estu eta larri zegoen bakarra. Helmholtzek ere eduki zituen bere nahasteak Agintariekin.

—Bertso batzuengatik izan huan —azaldu zuen Helmholtzek—. Emozio Ingeniaritza Goikoaz neure betiko kurtsoa ematen ari nintzaiean hirugarren urteko ikasleei. Hamabi ikasgai. Zazpigarrenak bertsoez tratatzen zian, «Propaganda Moral eta Iragargintzako Bertso Errimatuen Usadioaz» garbi esateko. Beti argitu ohi dizkiat nire irakasketak zenbait adibide teknikoz. Oraingoan idatzi berri nuen zerbait ematea bururatu zitzaidaan. Zentzugabekeria garbia, noski. Baina ezin izan nioan tentazioari eutsi. —Barreari ekin zion—. Jakingura ninduan zer erreakzio sortaraziko zuen. Gainera —ekin zion astunago— propaganda pixka bat egin nahi nian. Bertso haiek idaztean neuk sentitu nuen berbera sentiarazi nahi niean. Ford! —Barre egin zuen berriro ere—. Han antolatu huan antolatzekoa! Nagusiak deitu eta amenazu galantak jaurtiki zizkidaan, berehalaxe kanpora botako ninduela, eta abar. Fitxaturik negok.

—Baina, zer zioten, bada, hire bertsoek? —galdetu zuen Bernardek.

—Bakardadeari buruz hituan.

Bernardek bekainak jaso zituen.

—Nahi baldin baduk, errezitatuko dizkiat.

Eta honela hasi zen Helmholtz:

*Atzoko komitea*
*makila hotsean*
*danborra jotzea*
*gauerdia Cityn*
*turutak hutsean*
*Ezpainak itxirik*
*aurpegiak lo,*
*makina guztiak geldirik*
*jende bilguak muturik.*
*Horra isiltasun guztiak pozez*
*negarrez (altu edo baxu)*
*hizketan, nik al dakit noren ahotsez.*
*Susanaren eta Egeriaren beso eta bular,*
*ezpain eta ipurdi: hauen ausentziak*
*presentzia bihurtzen.*
*Zein presentzia ordea? galdezka nago.*
*Zer esentzia absurdo eta huts baizik ez denak*
*betetzen dit gaueko hutsa,*
*izorratzen dudan ohaide tristeak baino ere gehiago?*

—Beno —jarraitu zuen Helmholtzek— bertso hauek adibidetzat jarri nizkiean, eta haiek nagusiari salatu.

—Ez nauk batere harritzen —esan zuen Bernardek—. Irakaskuntza hipnopediko guztien kontra baitoaz. Pentsa ezak gutxienez berrehun eta berrogeita hamar mila ohar hartu dituztela bakardadearen kontra.

—Bazekiat. Baina zer efektu sortarazten zuen nahi nian jakin.

—Horra, bada, jakitun hago orain.

Bernardek pentsatu zuen Helmholtz, bere buruhauste eta guzti ere, oso zoriontsu zela.

Helmholtz eta Basatia adiskide mami egin ziren berehala. Hain mami, non Bernard jelosiaz erretzen baitzegoen. Hainbeste astetan Bernardek Basatiarekin lortu ezin izan zuen adiskidetasuna, horra Helmholtzek berehalaxe lortu zuela. Haiei begiratuz, haiek hizketan entzunez, behin baino sarriago damutu zitzaion biak elkar ezagutarazia. Lotsa zen bere jelosiaz eta egin ahalak egiten eta soma hartzen zuen sentimendu hartatik libratzeko. Baina alferrikako ahaleginak; gainera, somazko bakazioek ere, nahitaezko tarteak dituzte. Eta sentimendu higuingarri hura maiz eta maiz bururatzen zitzaion.

Basatiak eta Helmholtzek hirugarrenez elkar ikustean, honek bakardadeari buruzko bere bertsoak errezitatu zizkion.

—Zer deritzok? —galdetu zion gero.

Basatiak buruari eragin zion.

—Adi ezazu hau —esan zion erantzun ordez.

Eta bere liburu horzkatua giltzez gorderik zeukan kajoia irekirik, hartu eta irakurtzen hasi zen:

*Ahots ozeneko txori*
*Arabiako zuhaitz bakartian kantari*
*Hura bedi*
*mezulari triste eta turutari.*

Helmholtzek gero eta larriago aditzen zuen. «Arabiako zuhaitz bakartia» entzutean ikaratu egin zen. Gero «hi, mezulari zalapartatsu hori» entzutean, irribarre egin zuen bapateko atseginez. Gero «Hego tiranikodun txoriak oro» bertsoan masailak odoldu zitzaizkion. Baina «hileta musika» harena entzutean zurbil eta dardar jarri zen, ordura arte inoiz sentitu ez zuen emozioz.

Basatiak irakurtzen jarraitu zuen:

*Jabetasuna ikaratu egin zen*
*lehengo nitasuna ez zela lehengo bera ikustean*
*Bi izen natura bakar batentzat,*
*ez bi ez bat dei zitezkeenak.*
*Arrazoiak, bere baitan erraturik,*
*banakuntza bat egiten zela zekusan.*

—Uhuhu-Ahaha! —oihukatu zuen Bernardek, barre--algara zaratatsuz eta garratzez irakurketa etenaraziz—. Elkartasun Zerbitzuko eresi bat dela ematen dik hain zuzen.

Honelaxe mendekatzen zen bere bi lagunez, berari baino elkarri estimazio gehiago ziotelako.

Hurrengo bi edo hiru bileretan ere bere mendekutxo hura erabili zuen sarritan. Hura oso erraza zen eta, biek, bai Helmholtzek eta bai Basatiak, beren poesiazko kristal maitatua hausten eta lohitzen ikustean, asko sufritzen zutelarik, oso mendeku egokia zen. Azkenez, Helmholtzek, berriz eteten bazuen, ipurdian ostikada bat emanda, bertatik jaurtikiko zuela esan zion.

Baina harrigarri badirudi ere, hurrengo etena, denetatik okerrena, Helmholtzek berak eginarazi zuen.

Basatiak *Romeo eta Julieta* irakurtzen ziharduen ozenki, lehiaz eta dardaraz (zeren bere burua baitzekusan Romeorengan eta Lenina Julietarengan). Helmholtzek adi eta harri entzun zuen bi maitaleek lehenengoz elkarrekin topo egin zuten pasadizoa... Baratzako pasadizoak liluraturik utzi zuen bere poesiaz; baina han azalduriko sentimenduek irribarre eginarazi zioten. Barregarri zeritzon benetan neskatxa bat desiratze hutsagatik hala jarri beharrari. Hala ere, dena jorik, Emozio Ingeniaritzako pieza bikaina, alajaina!

—Idazle zahar horren ondoan —esan zuen— gure propaganda teknikorik onenak asto bedeinkatua zirudik.

Basatiak irribarre egin zuen garaile airez eta berriro ekin zion irakurketari... Bapo zihoan dena, baina hara hirugarren ekitaldiko azken agerraldian, Capuleto senar-emazteek Parisekin ezkontarazi nahi zutela Julieta. Helmholtz urduri ageri zen agerraldi osoan zehar. Baina, Basatiak aire patetikoz interpretaturik, Julietak hots egin zuen:

*Ez al da urrikirik lainoen gainean*
*iker dezanik ene saminen barrena?*
*Oi, ene ama goxo, ez nazazu, otoi, ni gaitzets.*
*Luzatu, otoi, ezkontza hau, hilabetez, astebetez,*
*edo, nahi baduzu, jarri ene ezkontohea*
*Tibaldo datzan hilobi tristean...*

Julietak hau esan zuenean, Helmholtzek egundoko barre-karkara jaurtiki zuen.

Aita bat eta ama bat (hau lizunkeria zakarra!) berak nahi ez zuenarekin ezkontarazten alaba! Eta zergatik neskatxa tuntun hark ez zien esan beste batekin baturik zegoela, ordukoz behintzat maiteago zuena? Absurdoaren lizunez eta lizunaren absurdoz egoera komiko hartaz ez zegoen barreari eusterik. Helmholtzek hamalau ahaleginez ere, ozta euts ziezaiokeen gorantz zetorkion barre uholari. Baina «ama goxo» hura (Basatiak esturaz eta dardaraz esana) eta Tibaldo hilaren aipatzea (hila, bai, baina erraustu gabe, jakina, eta bere fosforoa hilobi triste batean alferrikalgurik) gehiegi ziren noski. Hura barre egitea, masailak malkotan beratzeraino. Barre eta barre egin zuen etengabe. Basatia, bitartean, zurbilik eta suminik, liburuaren gainetik begira zegokion. Baina hango barreek ez zutela azkenik ikustean, liburua haserrez itxi, zutitu eta

zerrien muturretik bitxi bat apartatzean bezalako keinuz, bere kajoian zarratu zuen giltzaz.

—Hala eta guztiz ere —esan zuen Helmholtzek, aitzakiak jartzen hasteko adina arnasa hartu eta Basatiari bere esplikazioak entzunaraztea lortu zuenean—, bazekiat ondotxo ere honelakoxe egoera barregarriak eta eroak behar dituela batek. Ez zegok egon ere, beste ezertaz ondo idazterik. Zergatik ote zen idazle zahar hura hain propaganda tekniko bikaina? Anitz eta anitz gauza ero eta nabarmen zuelako ernearazteko. Jota edo endredatuta egon behar dik batek. Bestela ez zegok egiazko frase onik eta X izpiak bezain sarkorrik asmatzerik. Baina... Aita-amen zer hori! —Buruari eragin zion—. Ez duk esperoko aita-amez aritzean serio jarriko naizenik? Nori arraio axola zaio mutil batek neskatxa bat lortuko duen edo ez?

Basatiak putin egin zuen, baina Helmholtz ez zen konturatu, lurrera begira baitzegoen pentsakor.

—Ez —bukatu zuen— ez dik balio. Beste erokeria edo gogorkeria klase bat behar diagu. Zer, ordea? Zein? Non aurki dezaket? —Mementu batez isilik egon zen eta gero, buruari eraginka, esan zuen azkenez—: Ez zekiat, ez zekiat.

# HAMAHIRUGARREN KAPITULUA

Henry Foster Enbrioi Biltegiko arginabar gorriskatik agertu zen.

—Nahi al duzu gaur gauez sentsoramara joan?

Leninak ezetz egin zion buruaz, ezer esateke.

—Besteren batekin al zoaz?

Henryk ardura handia zeukan beti bere lagunek zer bikote egiten zuten jakiteko.

—Benitorekin, ala?—galdetu zuen.

Leninak berriro ere ezetz buruaz.

Henryk hauteman zuen Leninaren purpura begietako neke adierazpena, haren azalaren zurbila lupus dirdiraren azpitik, eta irribarre nahiko zituen ezpain ertz gorri haietako tristura.

—Ez al zaude gaixorik gero? —galdetu zuen ardura-tuxe, oraindik geratzen ziren gaitz itsaskorren bat Leninak ote zeukan beldurrez.

Leninak hirugarrenez ezetz buruaz.

—Nolanahi ere, medikuarengana joan behar zenuke —esan zuen Henryk—. «Medikua ikusi, minak ihesi»

—gaineratu zuen amoltsuki, bizkarrekotxo batez lagundurik irakasketa hipnopedikoa—. Haurdunaldi Orde baten beharra duzu agian —sujeritu zion—, edo G.B.A.ren tratamendu gogor bat. Badakizu, bada, batzuetan Grina Bortitz Artifizialaren indarra ez dela iristen…

—Forden amodioarren! —esan zuen Leninak bere isiltasun tematia hautsirik— Zaude isilik behingoz!

Eta bizkar emanik, bere enbrioiei ekin zien berriro. G.B.A.ren tratamendua? Barreari emango zion Leninak, ia negar egitekotan egon ez balitz. Bere G.B.A.rekin ere aski ez balu bezala! Xiringatxo bat bete bitartean, hasperen sakona egin zuen. «John —murmuriatu zuen berekiko— John…» Gero galdetu zion bere buruari: «Ford! eman ote diot honi loeriaren kontrako injekzioa? Ala ez diot oraindik eman? Ezin gogoratu. Azkenez erabaki zuen bigarren dosirik ez sartzea badaezpada, eta hurrengo ilarara pasa zuen fraskoa.

Une hartatik hogeita bi urte, zortzi hilabete eta lau egunera, Alfa-Gutxiago gazte eta Mwanza-Mwanzako administrari etorkizuntsu bat tripanosomiasiz hilko zen. Lehenengo kasua mende erdi baino gehiagoan. Hasperenka, Leninak bere lana jarraitu zuen.

Ordu erdi geroago, Jantzitegian, Fanny agirika bizian ari zitzaion.

—Absurdoa dun horrela jokatzea. Absurdoa benetan —esan zuen berriro—. Eta zergatik guztia? Gizon bategatik! Gizon bakartxo bategatik!

—Huraxe dun, ordea, gustatzen zaidan bakarra.

—Munduan milioika gizon ez baleude ere!

—Baina niri ez zaizkidan gustatzen!

—Nola dakin hori, frogatu ez baditun?

—Bai dizkinat frogatu!

—Zenbat, ordea? —galdetu zuen Fannyk mespretxuz, bizkarrak uzkurturik.

—Dozenaka. Eta alfer-alferrik —esan zuen Leninak buruari eraginez.

—Ba, ekin egin behar dion —esan zuen Fannyk sententzia gisa. Bistan zegoen, ordea, bere aholkuetan ere ez zeukala ia konfidantza handirik—. Ekin ezik ez zegon ezer lortzerik.

—Baina bitartean…

—Ez ezan harengan pentsa.

—Ezin dinat galerazi.

—Har ezan soma apur bat.

—Hartzen dinat.

—Segi orduan aurrera.

—Baina bitarteetan gustatzen zaidan. Beti gustatuko zaidan.

—Beno, horrela baldin bada —esan zuen zarta Fannyk— zergatik ez haiz joaten eta harrapatzen? Berak nahi edo nahi ez.

—Baheki zein arraro egon zen!

—Hainbat arrazoi gehiago zirt edo zart egiteko.

—Esan bai erraz.

—Utz itzan tontakeria horiek. Egin ezan egitekoa. —Fannyren ahotsak tronpetaren hotsa zirudien. «Fordtar Gazteen Elkarteko» hizlaria zirudien, Beta-Gutxiago gaztetxo talde bati gaueko hitzaldi bat emanez—. Egizan, bai, egin berehalaxe. Egizan oraintxe.

—Lotsa naun —esan zuen Leninak.

—Egin aurretik gramo erdi soma hartzea dun aski. Eta orain banihoan neure bainua hartzera. —Eta bertatik tente irten zen, eskuoihala tatarrez zeramala.

Tinbreak jo zuen. Basatia urduri zegoen, Helmholtz arratsalde hartan ikustera etor zekion zain (zeren Helmholtzi Leninaz hitz egitea erabaki zuenez geroztik, ez zitzakeen apurrik ere luza bere konfidentziak). Salto bat eman zuen, bada, eta aterantz abiatu zen korrika.

—Etorriko hintzela ematen zidaan barruak, Helmholtz —hots egin zuen atea irekiz.

Saten-azetatozko marinel jantzi zuriz, eta buruan txanotxo borobil bat, zuria hau ere, ezkerretarantz maltzurki okertua: Lenina zen bera.

—O! —hots egin zuen Basatiak, norbaitek makilkada itzel bat eman balio bezala.

Gramo erdi izan zitzaion aski Leninari bere beldur lotsak uxatzeko.

—Kaixo, John! —esan zion irribarrez.

Eta gelara sartu zen. John, automata gisa, itxi atea eta bazerraion. Lenina eseri zen. Isilune luzea gero.

—Ez dakit baina badirudi ni ikusteak ez zaituela askorik pozten, John —esan zuen azkenez Leninak.

—Ez nauela pozten?

Basatiak haserre airez begiratu zion. Gero bapatean belaunikatu zitzaion aurrean eta Leninaren eskutik oraturik, erreberentziaz mun eman zion.

—Ez naizela pozten? O, bazeneki jakin! —esan zion ahopetik; eta begiak haren aurpegira altxatzen ausarturik, jarraitu zuen—: *Lenina miragarria, miragarri guztien gailurra, munduan denik onenaren dina.*

Leninak ezin eztiago irribarre egin zion.

—*O, zu, horren perfet* —Lenina hurreratuz zetorkion ezpainak erdi zabalik—, *horren perfet eta paregabe* —Lenina hurrerago eta hurrerago zetorkion—, *izaki bakoitzaren onenaz kreatua!* —Hurrerago oraindik. Baina

Basatia zutitu egin zen kolpera—. Honegatik —esan zuen, begiratu gabe hitz eginez—, zerbait egin nahi nuke lehenengo... Nahi dut esan, zure dina banaizela erakutsi. Badakit, izatez ez naitekeela izan. Baina guztiz *ezdina* ere ez naizela erakutsi bederen. Zerbait egin nahi nuke.

—Baina zergatik deritzozu horren beharrezko...? —hasi zen Lenina.

Baina ez zuen esaldia amaitu. Haserre kutsua nabari zitzaion ahotsean. Norbera aurrerantz makurtzen denean, gero eta hurrerago, ezpainak erdi zabalik eta bapatean, tenteltzar bat zutik jartzen zaiolako, hutsaren gainera makurturik aurkitzen denean... arrazoirik franko du, bai, haserre jartzeko, nahiz eta gramo erdi soma eduki odolean.

—Malpaisen —zioen nahas-mahaska Basatiak—mendiko lehoi baten larrua eraman beharra zegoen andregaiari... nahi dut esan, bat ezkongura zenean. Edo otso batena bestela.

—Ingalaterran ez duzu lehoirik, ordea —esan zuen Leninak tonu irainduz.

—Eta balego ere —gaineratu zuen Basatiak bapateko haserrez eta arbuioz—, hilko zituztelakoan nago helikopteroetatik edo gas pozoitsuz. Eta nik ez dut honelakorik inola ere nahi, Lenina. —Koadratu zitzaion, begiratzen ausartu zitzaion eta Leninaren aurpegia ezulerkor eta suminkor aurkitu zuen. Artega eta gero eta nahas-mahasago, honela jarraitu zuen—: Egingo dut zerbait. Zeuk nahi duzuna. Bada kirol nekagarriagorik, ondo dakizunez. Baina ematen didan atseginak sobera kitatzen dit neke hori. Horra zer gertatzen zaidan. Goiak eta beheak garbituko nituzke, zuk hala nahi bazenu.

—Baina aspiragailuak baditugu hemen —esan zuen Leninak harriturik—. Ez dago horretarako beharrik!

—Bai, noski, badakit ez dagoela beharrik. Baina bada zenbait arlotekeria, nobleziaz egin daitekeena. Zerbait nahi nuke nobleziaz egin. Konprenitzen al duzu?

—Baina aspiragailuak egonik…

—Ez dut hori esan nahi.

—…eta Epsilon erdi ipotxak haiek maneiatzeko —jarraitu zuen Leninak—. Zergatik?

—Zergatik? Ba… zeugatik! Zeugatik! Erakusteko zenbat…

—Eta zer zerikusirik dute aspiragailuek lehoiekin?

—Zenbat…

—…edo lehoiek ni ikusteaz poztearekin? —Lenina gero eta haserreago zegoen.

—…zenbat maite zaitudan, Lenina —bota zuen noizbait Johnek, ia desesperaturik. Leninari masailera igo zitzaion odola, barruko pozkario urgoraren ezaugarri.

—Benetan al diozu, John?

—Baina ez nuen esan nahi —hots egin zuen Basatiak, eskuak bortxaz baturik hilzorian bezala—. Ez nuen esan nahi harik eta… Aizu, Lenina, Malpaisen ezkondu egiten da jendea.

—Zer egiten da?

Ahoskera garraztuz zihoakion berriro. Zer katramila zekarkion, ordea, orain?

—Betiko elkartzen dira. Betiko elkarrekin bizitzea agintzen diote elkarri.

—Bai burutazio zantarra!

Lenina atsekabeturik zegoen benetan.

—*Kanpoko edertasunak baino gehiago iraunez, odola ahulduz doan baino askoz bizkorrago birloratu ohi den arima batez…*

—Zer?

—Shakespearek dio beste hau ere: *Birjin korapiloa hausten badiozu, zeremonia jainkojale guztiek errito osoz eta santuz ahal dezaten baino lehen…*

—Forden amodioarren, John, etzazu aldrebeskeriarik esan! Ez dut diozunetik tutik konprenitzen. Lehen aspiragailuak zirela, orain korapiloak. Burutik eragin behar didazu. —Leninak salto egin zuen oin puntetan eta nola buruz hala gorputzez ere Johnek ihes egingo zion beldurrez, eskuturretik oratu zion—. Erantzuiozu galdera honixe: gustatzen al natzaitzu benetan? Bai ala ez?

Isilunetxo bat egin zen; gero emeki-emeki Johnek esan zuen:

—Munduko ezer baino maiteago zaitut.

—Orduan zer deabrurengatik ez didazu esaten —hots egin zuen Leninak eta haserrearen haserrez atzazalak sartu zizkion Johni eskuturrean—. Korapiloa, aspiragailua, lehoia eta kopla, hainbeste astetan dohakabe ninduzularik?

Askatu zion neskak eskua eta bortxaz aldenarazi zuen.

—Hain gustoko ez bazintut —esan zuen— ernegatuko ninduzun.

Eta bapatera inguratu zion lepoa besoez; Johnek haren ezpain leunak sentitu zituen bereen kontra. Hain eztiki leun, bero eta elektriko, non *«Hiru aste helikopteroan»*go musuez oroitu behar derrigor. «Oooo! Oooo!», neskatxa beilegi estereoskopikoa, eta «Aaaa! aaaa!» beltz super-erreala. Ikaragarria, ikaragarria, ikaragarria. Johnek egin zuen ahaleginik askatzeko, baina Leninak estuago besarkatzen zuen.

—Zergatik ez zenidan esan? —esan zion aurpegia aldendurik bera ikusteko.

Leninak akar xamurrez beterik zituen begiak.

«Ez ziegarik ilunenek, ez lekurik egokienek —burrunbatzen zion kontzientziak poesiaz— ez eta gure jeinurik gaiztoenen sugestiorik bortitzenek ahal dukete inoiz ene ohorea lizunkeria bihur.» Sekula ere ez! Sekula ere ez!

—Pello zozo! —esan zuen Leninak—. Zenbat desio zintudan! Eta zeuk ere desio baninduzun, zergatik ez…?

—Baina Lenina… —hasi zen John aiko-maikoka.

Eta nola Leninak berehalaxe besarkada askatu eta apartatu zitzaion, Johnek mementu batez pentsatu zuen konprenitu ziola bere ohar mutua.

Baina Leninak txarol zurizko kartutxontzia askatu eta kontuz-kontuz aulki adarretik eskeki zuenean, susmo txarrak egiten hasi zen John, erratua ote zegoen.

—Lenina! —esan zion berriro ahalkez.

Leninak esku bat leporatu eta tirakada gogor bat egin zuen beherantz. Marinel blusa zuria josturatik ireki zen. Susmoa egia bilakatu zitzaion.

—Lenina, zertan ari zara?

Leninaren erantzunak ez zuen hitzik behar.

Dzist-dzast! Atera zen bere kanpai antzeko galtzetatik. Barruko arropak, pieza bakarrekoak, oskol larrosazkoa ematen zuen. Artxitxantrearen urrezko T distiraka zeukan bularrean.

«Leiho saretik gizonen begietara sartzen diren bular horiek…» Hitz kantari, durunditsu, magiko haiek are arriskutsuago, are liluragarriago agerrarazten zioten Lenina. Hitz leunak, leunak, baina bai sarkorrak ere! Arrazoimena zulatuz, erabakirik sendoenak kraskatuz «biraorik indartsuenak lasto antzo dira odolaren suarentzat. Edazu gutxiago, edo bestela…»

Dzast! Larrosa koloreko borobildura bitan zabaldu zen, garbiro erdibiturik sagar bat bezala. Besoak eraginka,

hanka eskuina jasoz; gero ezkerra, eta horra prenda fina lurrean, hilik eta husturik.

Zapata-galtzerdiak oinetan eta txanotxo zuria buruan zituela, Lenina hurreratu zitzaion berriro.

—Ene maite, lehenago esan bazenit!

Leninak zabaldu zituen besoak.

Baina berak ere «ene maite» esan eta besoak zabaldu beharrean, Basatiak atzerantz egin zuen, besoak astinduz, abere sarkin eta oker bat uxatzeko bezala. Lau pauso atzerantz eta hormaren kontra aurkitu zen noraezik.

—Ene maitetxo! —ziotsan Leninak. Eta eskuak sorbaldetan kokaturik, arrimatu zitzaion—. Ingura nazazu zeure besoez —agindu zion—. Besarka nazazu, ene maite, drogatuta nagoen arte. —Bazuen Leninak ere poesia bikainik, bazekien berak ere hitz kantaririk, formula magikoen eta danbor hotsaren antzeko zirenak—. Muxuka nazazu. —Leninak itxi zituen begiak eta bere ahotsa erdi lotako murmurika bezalatsu egin zen—. Musuka nazazu, hilzorian nagoen arte; besarka nazazu ene maite... —Basatiak oratu zion eskuturretatik, eraitsi zizkion besoak bere sorbaldetatik eta metro bat urrutiarazi zuen beregandik.

—Ai! Min ematen didazu... O!

Lenina isildu zen kolpera. Izuaren izuak mina ahaztarazi zion. Begiak irekitzean, Johnen aurpegia ikusi zuen. Ez, hura ez zen Johnen aurpegia, ezezagun amorratu batena baizik, zurbilik, zimurrik, sumin eroz bihurrikaturik.

—Baina zer gertatzen zaizu, John? —murmuriatu zuen Leninak.

Basatiak ez zion erantzun. Bekoz beko begira zegokion bere ero begiez. Leninari eskuturretatik oraturiko eskuak dardarka zituen. John arnasestuka ari zen sakonki.

Ahul, ia oharkaitz, baina berdurgarri, Leninak bapatean haren hortz-karraska entzun zuen.

—Zer gertatzen zaizu? —esan zuen ia txilioka. Eta txilio harexek iratzarri balu bezala, Johnek sorbaldetatik oratu eta astinaldi ederra eman zion.

—*Mari urde!* —hots egin zuen—. *Mari urde! Bargastatzar lizun hori!*

—O, ez, ez…! —protestatu zuen Leninak, astinaldiek barregarriro eteniko ahotsez.

—Mari urde!

—Mesedeeeez!

—Mari urde madarikatua!

—Graaamo baaat hooobe daaa…

Basatiak halako bortxaz jaurtiki zuen beregandik, non Lenina kordokatu eta erori egin baitzen.

—Hoa! —hots egin zuen Johnek, bere ondoan zutik, mehatxuka—. Ospa hemendik berton garbitzea nahi ez badun.

Eta ukabilak itxi zituen. Leninak beso bat jaso zuen aurpegia estaltzeko.

—Ez, mesedez, ez, John…

—Agudo gero! Azkar!

Besoa goian oraindik eta Johnen mugimenduei izu begiz jarraituz, zutitu zen Lenina eta erdi kokoriko eta burua gordez, bainurantz abiatu zen korrika.

Abiadura bizkorrarazteko Johnek jo zion txalo izugarriaren hotsak pistola tiroaren zarata atera zuen.

—O! —oihukatu zuen Leninak aurrerantz saltatuz.

Bainugelan giltzaz zarraturik eta salburik ia, Lenina bere ubeldurak aztertzen hasi zen. Zutik eta ispilura atzez, burua bueltatu zuen. Sorbalda gainetik begiraturik, han zekusan argi-argi eta gorri-gorri esku zabalaren hatza, be-

re nakar koloreko larruaren gainean. Kontuz-kontuz igurtzi zituen minbera zeuzkan alderdiak.

Beste gelan dinbi-danba zebilen Basatia alderik alde, pausakera itzelean, danborren konpasera eta hitz magiko hauen musikara: «Txepetxa jaurtikitzen zaio gainera eta horra urrezko eulitxoa lizunkoi portatzen ene begien aurrean». Hitzek erogarriro hots egiten zioten belarrian. «Ez dago lepatxuririk ez zaldi zikinik grinatsuago horretara jotzen duenik. Gerritik behera zentauroak dira, nahiz eta gerritik gora emakumeak izan. Gerritik gorakoa Jainkoengandik hartu dute. Handik beherakoa, ordea, dena dute deabruzko, dena dute ifernu, ilunbe, sufrezko leize, sutan, irakiten, kirastua, usteldua. Uf! Emaidazu ontza bat algalia, botikari jauna, pixka bat goza dezadan ene irudimenaz».

—John! —ausartu zen deitzera ahostxoa bainugelatik, Basatiarekin adiskidetu nahiez—. John!

«Oi, zu belartxar, hain eder eta lurrintsu, zentzuak zugatik zorarazten dituzuna! Nola egina izan da hain liburu ederra, «emagaldu» idazteko bertan? Zu hurreratzean, sudurra estaltzen du zeruak...»

Baina Leninaren lurrina inguruan zebilkion oraindik, eta Johnen jaka irineztaturik ageri zen Leninaren tertziopelozko gorputza lurrindu zuen hautsez.

«Bargasta zikina, bargasta zikina, bargasta zikina». Erritmo errukigabe hura mailuka ari zitzaion. «Bargasta...»

—John, emango al dizkidazu arropak?

Basatiak batu zituen lurretik kanpai antzeko galtzak, brusa eta azpiko prenda.

—Ireki! —agindu zion, ateari ostikada bat emanik.

—Ez, ez dut nahi.

Ahotsa ikaraz eta mesfidantzaz entzun zen.

—Beno, nondik arraio ematea nahi duzu, orduan?

—Pasa itzazu ate gaineko haizegailutik.

Johnek hala egin zuen eta gero berriro ekin zien bere joan-etorri urduriei gelan zehar. «Bargasta zikina, bargasta zikina... Haragikeriaren deabrua, bere ipurdi borobilez eta patatazko atzamarrez...»

—John!

Basatiak ez zuen erantzuten. «Ipurdi borobilez eta patatazko atzamarrez.»

—John!

—Zer nahi duzu? —galdetu zuen Johnek betilun.

—John!

—Ba... emango bazenit nire kartutxontzi malthustarra...

Leninak eserita zirauen alboko gelako pauso hotsa entzunez eta bere buruari galdezka zenbat denboran ibiliko ote zen John han batetik bestera, ea zain egongo ote zen Johnek bere etxetik alde egin arte, ala beroaldi hura baretzeko adina denbora emanez gero, komuneko atea ireki ahal izango ote zuen eta korrika abiatu kanpora.

Asmaketa larriotan ziharduela, hara telefono hotsa alboko gelan. Johnen joan-etorriak kolpera bukatu ziren. Leninak Basatiaren ahotsa entzun zuen isilarekin elkarrizketan.

—Esan.

...

—Bai.

...

—Neure buruaren ordez ari ez banaiz, nerau nauzu.

...

—Bai. Ez al didazu entzun? Mr. Basati nauzu.

. . .

—Nola? Nor dagoela gaixorik? Jakina, bada, axola zaidana.

...

—Baina larria al da? Hain gaizki al dago emakumea? Berehalaxe noa.

. . .

—Ez dagoela bere gelan? Nora eraman dute, bada?

. . .

—Oi ene Jainkoa! Emaidazu helbidea.

. . .

—Park Lane, hiru, ez al da? Hiru? Eskerrik asko.

Leninak aurikularraren eskegiera entzun zuen eta gero pauso hots bizkorra. Ate bat brasta itxi zen. Gero isilunea. Joana ote zen John?

Kontuz baino kontuzago, Leninak zentimetro erdi ireki atea eta zirrikitutik begiratu zuen. Gela hutsik ikustean lasaitu zen pixka bat. Gehixeago ireki eta burua atera zuen. Azkenez oinen puntan sartu zen gelara. Adi-adi jarri zen, bihotza taupadaketa bizian ari zitzaiola. Gero kanporako aterantz korrika abiatu, ireki, pasilura pasa, brasta itxi berriro, eta korrika jarraitu zuen. Eta azentsorea harrapatu eta beherantz hasi arte, ez zuen bere burua salbu ikusi.

# HAMALAUGARREN KAPITULUA

Park Lane-ko Hiltzekoen Ospitalea hirurogei solairuko dorrea zen, bazko lore koloreko adreiluz batua. Basatiak taxikopterotik jaistean, hileta-auto hegalari sail bat ikusi zuen, kolore alaiz pintatuak. Azoteatik igo eta mendebalerantz jo zuten, Slougheko Erretegirantz, parkean zeharkatuz. Azentsoreko ate aurrean, atezain nagusiak eman zion beharrezko informazioa eta hamazazpigarren solairuko 81. gelara jaitsi zen (zahartze larriaren gelara, atezainak azaldu zuenez).

Gela handia zen, horiz pintatua eta eguzkiak txit argitua. Hogei ohe bertan, denak beterik. Linda azkenetan zegoen, ondo lagundurik eta aurrerapen moderno guztiekin. Doinu sintetiko alaiek etengabe astintzen zuten airea. Ohe bakoitzaren oinean, bere hiltzekoen aurrez aurre, telebista bana. Telebista goizetik gauera arte pizturik zeukaten, txorrot ireki bat bezala. Ordu laurdenik ordu laurdenera, gelako lurrina prozedura automatikoz aldatu ohi zen.

—Ahalik eta —azaldu zion Basatiari atera irten zitzaion andre erizainak—, ahalik eta girorik atseginena

edukitzen saiatzen gara, lehen mailako hotel baten eta sentsorama gela baten erditsuko zerbait. Konprenitzen al duzu zer esan nahi dudan?

—Non dago Linda? —galdetu zuen Basatiak, haren kortesiazko koplei kasurik egiteke. Erizainari min eman zion honek.

—Presa handiak darabiltzazu —esan zuen.

—Ba al da ezeren esperantzarik? —galdetu zuen Johnek.

—Hil ez dadin nahi duzu esan? —Johnek baietz esan zion—. Ez, bada, inola ere ez. Inor hona bidaltzen dutenean, ez dago… —Mutilaren aurpegia hain samin eta zurbil ikusteaz harriturik, erizaina isildu egin zen—. Beno, zer gertatzen zaizu? —galdetu zuen. Ez zegoen hara zetozenetan halako erreakziorik ikusten ohitua. Gainera, hara zetozenak, arrazoizko zenez, gutxi-gutxi ziren—. Gaizki aurkitzen al zara?

Johnek ezetz buruaz.

—Neure ama dut —esan zuen, ia ozta entzuteko moduan.

Erizaina zur eta lur geratu zitzaion, begiak ere lekutik irten beharrik, eta berehalaxe apartatu zituen, txingarra bezain gorri-gorri jarririk.

—Lagun nazazu Linda dagoen lekura —esan zuen Basatiak, tonu normalez mintzatzen ahaleginduz.

Gorri-gorri oraindik, erizainak gelako beste alderantz eraman zuen. Aurpegi oraindik mardul eta gordinak (zeren hain zahartze azkarra izanik, ez baitzuen denborarik uzten masailak zimurtzeko, bihotzera eta burmuinera bakarrik jotzen baitzuen), itzultzen zitzaizkien handik igarotzean. Bigarren haurtzaroan sarturiko begi zurrun eta

motelek jarraitzen zizkieten pausoak. Basatiari dardara sartzen zitzaion hiltzeko haiei begiratzean.

Linda han zetzan horma aldeko erreskada luzeko azkenengo ohean. Buruko batzuen gainera etzanik, Riemann Hegoamerikar tenis Txapelketako azkenaurrekoak ikusten zegoen, ohe oinean jarririk zuen telebistako pantailan jokatzen ari zirenak birprodukzio isil eta txikian. Iruditxoak korrika zebiltzan batetik bestera kristal argituzko errektangelu txikian, zaratarik atera gabe, arrainak urtegian bezala: beste mundu bateko biztanle mutuak, baina saltogileak.

Linda irribarre goibelez begira zegoen hara, ezer konprenitzeke. Haren aurpegi zurbil eta handituari halako zorion tentelezko adierazpena zerion. Noizik noizera ixten zitzaizkion bekainak, eta segundu batzuetan lozorroan zirudien. Gero, ikaralditxo batez, berriro iratzartzen eta tenis Txapelketako akuariumera itzultzen zuen burua, edo Wurlitzer-Super-Ahotsak ematen zuen «Besarka nazazu, ene maite, drogatuta nagoen arte»-ren bertsiora, edo buru gaineko haizegailutik zetorkion berbenazko haize bolada berora. Zer guzti hauetara iratzartzen zen, edo, hobeki esateko, zer guztiok barnean zituen amets batera iratzartzen zen. Odolean zeraman somari eskerrak, transformaturik eta ederturik zekusan dena, eta irribarrez ari zen, bere haur pozezko irribarre apurtuz eta kolorgez.

—Beno, joan beharra dut —esan zuen erizainak—. Haur taldea ia etortzeko dago. Gainera 3. zenbakia zaindu behar dut. —Eta gelako beste ertza seinalatu zuen—. Ez hil bai hil dago eta. Zertan esanik ere ez zeure etxean zaudela.

Eta alde egin zuen presaka.

Basatia ohe alboan eseri zen.

—Linda —hots egin zion eskutik oraturik.

Bere izena entzutean, atsoa itzuli zen. Haren begi lausoetan bazen ezaguera izpi bat. Estutu zion eskua semeari, irribarre egin eta ezpainak mugitu zituen. Gero, bapatean aurrerantz erori zitzaion burua. Loak hartu zuen. John ondoan zegokion, begira-begira, azal zahar haren bitartetik bilatuz eta aurkituz Malpaisen bere haurtzaroan zeukan aurpegi gazte dirdiratsu hura; gomutatuz (eta Johnek begiak itxi zituen) haren ahotsa, haren mugimenduak, elkarrekin bizi zireneko gertaera guztiak. «Arre, estreptokokoak Banbury T-ra...» Zein ederki kantatzen zuen bere amak! Zein magiko eta misteriotsu zeritzen haur denborako bertso haiei!

*A Bitamina, B Bitamina, C Bitamina*
*koipea gibelean eta bakailoa itsasoan.*

Hitz haietaz eta Lindaren ahoskeraz oroitu ahala, begiak malkoztuz zihoazkion Johni. Gero irakurketa ariketak: «Haurtxoa ontzian dago; katua lo dago». Eta «Ikasgai Elementalak Enbrioi Biltegiko Beta langileentzat». Eta gaubela luze haiek sutondoan, edo udan etxeko azotean. Zenbat gauza kontatzen zion Erreserbatik urruneko Beste munduaz: Beste Mundu zoragarri hura, zeinaren gomuta hain garbi kontserbatzen baitzuen Johnek, zeru batena bezala, ontasunezko eta edertasunezko paradisu batena bezala, Londres egiazko hartako haragizko eta hezurrezko gizon eta andre zibilizatu haien errealitateaz kutsatu gabe.

Honetan ahots zorrotz batzuen zaratak begiak irekiarazi zizkion. Malkoei xukatu arin bat eman eta ingurura begiratu zuen. Han ikusi zuen gelara sartzen zortzi urteko biki ideen erreka amaigabea. Bikiak hurreratuz zetozen, bata bestearen atzean, ameskaitz bat bezala. Aurpegi haiek, aurpegi errepetitu hark (denek bat bakarra baitzeu-

katen) txarlin-txakurren begiradaz begiratzen zioten. Dena zuten sudurtzilo, dena begi saltari eta kolorge. Haurren uniformea kakizkoa zen. Txilioka eta berriketa hutsean sartu ziren. Mementu batean gela bete-bete egin zuten. Ohe artean txingurrika ziharduten, ohagainik ohagain, ohaperik ohape, katamarka, telebistari begira, edo gaixoei keinuka.

Linda ikustean harritu eta ia ikaratu egin ziren denak. Mutiko pila bat ohe oinean jarri zitzaion begira, kolpera zerbait ezezagunaren aurrez aurkitzen diren animalien ikusgura ergelez eta beldurtiz.

—O, begira, begira! —Txit altu eta ikaraz mintzo ziren—. Zer gertatzen zaio? Zergatik dago hain gizen?

Inoiz ez zuten ordura arte Lindarena bezalako aurpegirik ikusi. Inoiz ez zuten aurpegi gazte eta guriak, eta gorputz eder eta tenteak besterik ikusi. Azkenetan zeuden hirurogei urteko haiek neskatilak ematen zuten. Lindak, ordea, berrogeita lau urterekin, mamu zahar malmutz itxurge bat zirudien.

—Itsusiagorik! —zioten ikusle txikiek—. Begira nolako hortzak!

Honetan ohapetik, Johnen aulkiaren eta hormaren artetik, opil aurpegiko biki bat agertu zen, eta hur-hurretik begira jarri zen lo zegoen Lindaren aurpegira.

—Hau duk…! —hasi zen.

Baina esaldia txilio bilakatu zen laster. Basatiak lepotik oratu, aulki gainetik jaso eta eman zion belarrondokoaz lekutaraino jaurtiki zuen garrasika.

Garrasi haiek entzunaz batera, korrika etorri zen erizain nagusia.

—Zer egin diozu? —galdetu zuen haserre bizian—. Ez dut permitituko haurrik jo dezazun.

—Ken itzazu orduan ohe honetatik. —Basatiaren ahotsari ere sua zerion—. Zer arraio behar dute hemen mukizuok? Lotsagarria da hau!

—Lotsagarria? Zer nahi duzu esan? Honelaxe egokitu ohi ditugu heriotzaren aurrean. Eta zaude jakinean? —jarraitu zuen mehatxuka— Hauen egokimendua oztopatzen baduzu, atezainek bota beharko zaituzte.

Basatia zutitu zen eta bi pauso eman zituen bereganantz. Haren mugimenduak eta aurpegikera hain mehatxuzko baitziren, erizainak atzerantz egin zuen, zeharo ikaraturik. Ahalegin guztiak eginez, Johnek eutsi zion bere buruari, eta hitzik esateke, buelta osoa eman eta ohe alboan eseri zen berriro.

Golkoa lasaiago, baina duintasun ez hain seguruz oraindik, erizainak esan zuen:

—Jakinean zaude orain; zabiltza, beraz, kontuz.

Hala ere, biki kuriosoegi haiek kenarazi zituen ohe ingurutik eta gelako beste ertzean bere lankide batek antolaturik zeukan xagu-katuen jolasera bidali zituen.

—Zoaz orain zeure kikara bete kafeina urtu hartzera, ene laguna —esan zion beste erizain bati.

Bere agintasuna erabiltzean lehengo konfidantza bihurtu zitzaion eta beronek hobeki sentiarazi zuen.

—Ea haurtxook, goazen! —hots egin zuen.

Linda asaldatu zen ohean, artega; mementu batez begiak ireki zituen, ingurura zirriborroz begiratu, eta berriro ere lo gelditu zen. Haren ondoan eserita, Basatiak minutu batzuk lehenago eduki zuen gogo egoera hura berrartu nahi izan zuen gartsuki.

—A, B, C, D bitamina —errepikatzen zuen berekiko, hitz hauek iraganaldi hila bizira bihurtaraziko zukeen sorginkeria bat balira bezala.

Baina alferreko sorginkeria zen hura. Setatiki, oroipen eder haiek ez zuten agertu nahi; jelosia, itsuskeria eta miseria pila baten berpizte gorrotagarri bat besterik ez zen jalgi. Popé, haren sorbaldako zauriari odola zeriola, eta Linda nazkagarriro lo eginda, eta ohe ondoan, behean, isuritako meskalaren ingurutik euliak furrundaka, eta mutikoak halako gauzak esaten ari zitzaizkiolarik... Ez! ez! Begiak itxi zituen, burua eragin zuen, halako oroipenak gogorki eragotziz.

—A, B, C, D bitamina.

Bera haren altzoan zegoenean eta hark bere besartean zeukanean, eta kantatu, kantatu, kantatu eta birkantatu zueneko mementu haiek gogoratzen saiatu zen, hark loarazteko erabiltzen zituenekoak:

—A, B, C, D bitamina, D bitamina, D bitamina...

Wurlitzer-Super-Ahotsaren bolumena gehituz joan zen crescendo negartiraino, eta bapatean berbena hartako usain sistema patxulizko lurrin bizi bilakatu zen. Linda dardartu zen, itzarri zen, pixka batean semifinalistei begira egon zen harriturik, jaso zuen aurpegia airea betetzen zuen lurrin berria behin edo bi aldiz usnatzeko eta irribarre egin zuen kolpera, haur estasizko irribarrea.

—Popé —murmuriatu zuen; eta begiak itxi zituen—. O, zein atsegin zaidan, zein atsegin zaidan...!

Hasperen egin zuen eta berriro etzan zen burkoetan.

—Baina, Linda —erregutu zuen Basatiak—. Ez al nauzu ezagutzen?

Ahalik eta gehien saiatua zen, ahalik eta gehien egina zen. Zergatik ez zion berak ahazten uzten? Haren esku ahula hartu zuen, ia gogorkeriaz, bere atsegin lizunezko, bere oroipen baxu eta gorrotagarrizko amets hari uko egitera behartu nahi balu bezala, presentera, errealitatera,

kezkagarrizko presentera, errealitate ikaragarri hartara itzularazteko; oroipen haiek, hain zuzen, zetorkionaren hurbiltasunaz, are esangura desesperatuki garrantzitsuagoez beteak zirelarik.

—Ez al nauzu ezagutzen?

Erantzuntzat eskua estutzen ziola sentitu zuen Johnek. Begiak malkoztu zitzaizkion. Makurtu eta musu eman zion. Lindaren ezpainak mugitu ziren.

—Popé! —murmuriatu zuen berriro.

Eta palakada bat zimaur aurpegira jaurtiki baliote bezala sentitu zuen Johnek.

Barruak suminaren suminez irakiten hasi zitzaizkion berehalaxe. Bigarrenez huts hartu ondoren oinazezko pasio hura sumin agonikozko pasio bilakatu zitzaion.

—John nauzu, bada! —hots egin zuen— John nauzu!

Eta saminezko sumin hartan sorbaldetatik oratu eta astinaldi bat eman zion.

Geldiro-geldiro, Lindak zabaldu zituen begiak: beregan erreparatu zuen eta ezagutu zuen.

—John!

Baina Johnen egiazko aurpegi hura, Johnen egiazko esku bortitz haiek alegiazko mundu batean kokatu zituen: patxuliaren eta Super-Wurlitzer-en ordezko ezkutu eta pribatuen artean, bere ametsezko unibertsoa osatzen zuten oroipen transirudituen eta sentsazio estrainioki nahastuen artean. Bazekien bere seme John zela, baina sarkin zeritzan Johni Malpaiseko Paradisu hartan, non bere somazko oporrak pasa ohi baitzituen Popérekin. John amorrutan zegoen Lindak Popé maite zuelako, astinduka zerabilen Popé zegoelako Lindaren ohean. Horrek ezer txarrik balu bezala edo mundu zibilizatu guztiak berdin-berdin egin ohi ez balu bezala!

—Mundu guztia da…

Lindaren ahotsa berehalaxe ito zen, zurrunga ia entzungaitz bihurturik: ahoa zabaldu zitzaion eta Lindak ahalegin etsitua egin zuen birikak airez betetzeko. Baina bazirudien arnasa hartzeko teknika ahaztu egin zitzaiola. Garrasi egin nahi zuen baina ez zen inolako hotsik haren ezpainetatik atera; begi desorbitatuetatik zerion izuak bakarrik adieraz zezakeen haren oinaze neurria. Eskuak eztarrira eraman eta gero atzazalak airean josi zituen, sekula gehiago hatsartuko ez zuen aire hartan, berarentzat ia existitzen ez zen aire hartan.

Basatia zutik zegoen eta makurtu zitzaion.

—Zer duzu, Linda? Zer duzu?

Johnen ahoskera erreguzkoa zen, lasaitaraz zezan eskatuz bezala.

Lindak jaurtiki zion begirada egundoko izuz kargaturik zegoen; izuz eta —hala zeritzan berak— ahakarrez kargatua. Lindak ahaleginak egin zituen ohean tente jartzeko, baina burkoen gainera erori zen. Aurpegia izugarriro zatartu eta ezpainak ubel-ubel jarri zitzaizkion.

Basatia itzuli eta korrika abiatu zen gelako beste ertzera.

—Agudo, agudo! —hots egin zuen—. Agudo!

Xagu-katuetara jolasten ari ziren bikien korru erdian zutik, erizain nagusiak buelta eman zuen. Lehenengotako harridura bultzadak laster utzi zion leku gaitzespenari.

—Etzazu zaratarik egin! Pentsa ezazu haur hauengan! —esan zuen betoskoa zimurtuz—. Desegokitu egin… Baina zertan ari zara?

John korrua hautsi eta barrura zetorren.

—Kontuz baina! —oihukatu zuen erizainak. Haur batek negarrari ekin zion.

—Azkar! Zatoz agudo! —Johnek erizainari besotik oratu eta tatarrez eraman zuen—. Agudo! Zerbait gertatu da. Hil egin dut!

Gelako beste ertzera heldu zireneko, Linda hila zen.

Basatia isiltasun hotzean egon zen zutik apur batean. Gero ohe aurrean belaunikatu zen eta, aurpegia esku artean gorderik, negar eta negar egin zuen.

Erizaina zutik zegoen, zer egin ez zekiela, behin ohe ondoan belauniko zetzan irudi hari begira (erakustaldi lotsagarria!), behin bikiei begira (gizagaixoak!): beren jolasak utzi eta ahoa zabalik eta begiak galdu beharrik so eta so zeuden gizagaixoak 20. ohe inguruan gertatzen ari zen ikuskizun zatar hartara. Esango ote zion zerbait gizon hari? Esango ote zion itzul zedila bere senera? Gogoraraziko ote zion non zegoen eta zenbat kalte egin ziezaiekeen gizagaixo errugabe haiei? Heriotzari buruzko egokimendua hankaz gora jaurtikitzea halako samin uholde nazkagarriz! Hiltzea hain ikaragarria balitz bezala! Inori bost axola balio bezala! Ikuskari hark heriotzari buruz ideia txit okerra ezar ziezaiekeen haurtxoei. Ikuskari hark nahasirik utz zitzakeen, eta arras okerretara eta arras antisozialki portarazi.

Erizainak pauso bat aurrerantz emanik, sorbaldan jo zuen John.

—Ez al zaitezke zentzuratu? —esan zuen kontuz baina haserrez.

Baina ingurura begiraturik, dozena erdi biki zutitu eta haienganantz zetozela ikusi zuen. Erizaina presaka atera zitzaien bidera arriskuan zeuden bere ikasletxoei.

—Ea, nork nahi du txokolate ontzatxo bat? —galdetu zuen altu eta alai.

—Neuk! —hots egin zuen aho batez Bokanowsky sail guztiak.

20. ohea ahazturik zegoen.

«O!, ene Jainkoa, ene Jainkoa, ene Jainkoa...», zioen Basatiak berekiko, behin eta berriro.

Saminezko eta arrenkurazko kaos harez beterik zuela burua, ez zitzaion beste hitzik ateratzen.

—Ene Jainkoa! —ekin zion altu—. Ene...!

—Baina zer diozu? —galdetu zion hur-hurretik ahots argi eta zorrotz batek, Super-Wurlitzerren murmurika artean.

Ikaraldi galanta hartu zuen Basatiak eta aurpegia destalirik, ingurura begiratu zuen. Bost biki kaki, bakoitzak txokolate ontza luze bana eskuinean; bost aurpegi berdin-berdin, bostak txokolateztatuak, korru eginik bere bueltan, zakur begi saltariz begira.

Bost bikien eta Johnen begiek elkarrekin topo egin zuten, eta bostek batera irribarre egin zioten. Batek ohea seinalatu zuen bere txokolate ontzaz.

—Hilik al dago? —galdetu zuen.

Basatia begira-begira egon zitzaion apur batean isil--isilik. Gero, isilik zutitu eta isilik aterantz abiatu zen geldiro-geldito.

—Hilik al dago? —ekin zion berriro biki jakinguratsuak, galtzetatik tiratuz.

Basatiak begiratu zion eta, hitzik esateke, sakada bat eman eta jaurtiki zuen ingurutik. Bikia lurrera erori eta garrasika hasi zen. Basatiak ez zion kasurik ere egin.

# HAMABOSTGARREN KAPITULUA

Park Laneko Hiltzekoen Ospitaleko pertsonala ehun eta hirurogeita bi Delta ziren, bi Bokanowsky Sailetan banatuak. Sail batean larogeita lau eme ilegorri eta bestean hirurogeita zortzi biki ar buruzapal eta beltzaran. Arratsaldeko seietan, beren lanaldia bukatzean, Ospitaleko atarian biltzen ziren bi taldeak, eta komisari kutxazain ordeak nori bere soma dosia ematen zion.

Azentsoretik irtetean, Basatia beren artean gertatu zen. Baina haren burua handik urrun zegoen. Heriotzarekin zebilen, bere saminarekin, bere arrenkurekin; makina gisa zertan ari zen ez zekiela, jendartean zehar pasatzen hasi zen bristi-brasta.

—Ixo! Zer arraio dihardük denoi sakaka! Nora deabru joan behar duk, ordea?

Mehe edo sendo, eztarri pila hartatik bi ahots bakarrik entzuten ziren txilioka edo orroka. Bi aurpegi, mugagabe errepikatuak ispilu ilara batean bezala; bat ilargi bizarmotzaren antzekoa, pekaztoa eta gorrixka, eta bestea luzeska, txori mokoaren antzekoa eta bi eguneko bizarrez.

Bi aurpegiok haserrez begiratzen zioten pasaeran Johni. Hauen hitzek eta ematen zizkioten saihetsetakoek konturarazi zuten John non zegoen. Itzarri zen berriro kanpoko errealitatera, begiratu zuen ingurura eta kargutu zen zer zen zekusan hura. Eta kargutzean, izua eta nazka eman zioten batera: huraxe zen bere gau-egunetako zorabio etengabea, nonahi erruz ageri ziren idetasun perfektu, berezkaitz haien ameskaitza. Bikiak, bikiak... Harrak bezala, multzoka profanatu zuten Lindaren Heriotzako misterioa.

—Somaren banaketa! —hots egin zuen ahots batek—. Ordenan, mesedez. Ea, agudo.

Ireki zen atea eta norbaitek mahai bat eta aulki bat jarriak zeuzkan atarian. Alfa gazte lirain bat zen hots egin zuena. Burdinazko kutxatxo beltz bat galtzarpean zekarrela sartu zen. Pozezko murmurika atera zen zain zegoen biki multzoaren ezpainetatik. Berehalaxe ahaztu ziren Basatiaz. Gazteak mahai gainean jarri eta zabaltzen ziharduen kutxa beltz hartara zeuden begi eta belarri. Jaso zion estalkia.

—Ooooo...! —ulukatu zuten ehun eta hirurogeita hamabi Deltek era batera, su artifizialak ikusten baleude bezala.

Kutxatxo beltzetik latorrizko kutxatila eskukada bat atera zuen gazteak.

—Eta orain —esan zuen gazteak presaka— hurrera zaitezte mesedez. Bana-banaka eta bultzik egiteke.

Bana-banaka eta bultzik egiteke, bikiak hurreratu ziren mahai ingurura. Lehenengo bi ar, ondoren eme bat, gero beste ar bat, ondoren hiru eme, gero... Basatia begira zegoen. —*O, mundu berri bitxia! O, mundu berri bitxia!* Haren gogoan hitz erritmiko haiek doinuz aldatuak

ziruditen. Barre egin zioten bere saminari eta bere arrenkurari, lotsagabekeria zikinez eta gordinez egin ere. Deabru bihurriak bezala barre eginez, hitz haiek ageriago utzi zioten bere baitan zerabilen ameskaitzaren doilorkeria lizuna eta itsuskeria nazkagarria. Eta orain, bapatean, gudu-deia jotzen bezalako turuta hotsa ateratzen zioten. *O, mundu berri bitxia!* Mirandak edertasunaren ahalbidea, ameskaitza zerbait eder eta noble bihurtzeko ahalbidea proklamatzen zuen. *O, mundu beri bitxia!* Desafio bat, agindu bat zen.

—Ez sakadarik! —hots egin zuen, haserre bizitan komisari kutxazain ordeak. Brasta itxi zuen kutxa beltzaren tapa—. Txintxo ez bazarete portatzen, ez dizuet somarik banatuko.

Deltek erremuskada batzuk egin zituzten, elkarri ukondokada batzuk eman zizkioten baina azkenik isilik eta mantso geratu ziren. Amenazu hura eraginkorra izan zen. Somarik gabe geldi zitezkeela pentsatze hutsa ere ikaragarri zitzaien izaki haiei.

—Tira, beste itxura bat duzue orain! —esan zuen gazteak.

Eta berriro ireki zuen kutxa.

Linda esklabu izan zen; Linda hila zen. Besteok ordea, libre bizi behar zuten eta munduak berriro behar zuen bere ederrez jabetu. Erreparazio bezala, eginkizun bezala. Basatiak, bada, argi eta garbi ikusi zuen bere egitekoa. Kolpera leiho bat zabaldu edo gortina bat korritu balitz bezala zen.

—Ea! —esan zuen Komisari Kutxazain Ordeak.

Beste emakume kaki batek pauso bat eman zuen aurrera.

—Geldi! —oihu egin zuen Basatiak, ozen eta indartsu—. Geldi!

Jendartetik mahairaino pasa zen ukondoka. Deltek harriturik begiratzen zioten.

—Ford! —esan zuen Komisari Kutxazain Ordeak isilik—. Hona Basatia berton!

Beldurrak hartu zuen.

—Entzun, otoi, niri! —hots egin zuen Basatiak adoretsu—. «Entzun iezadazue…»! —Sekula ez zuen ordura arte jendaurrean hitzik egin eta lanak zituen esan nahi zuena adierazteko—. Etzazue sustantzia nazkagarri hori har! Pozoia duzue, pozoia.

—Ea, Mr. Basati —esan zuen Komisari Kutxazain Ordeak, adiskide gisa irribarre eginez—. Utziko al didazu…?

—Pozoia duzue hori, bai gorputzerako, bai arimarako.

—Ederki, baina utz iezadazu mesedez banaketa segi dezadan. Porta zaitez mutil on bezala.

—Sekula ere ez! —hots egin zuen Basatiak.

—Baina, aizu lagun…

—Jaurtiki ezazu ber-berton pozoi zital hori.

Hitz hauek —«jaurtiki ezazu ber-berton pozoi zital hori»— Delten ulertezinaren estratuetan barrena sartu ziren, haien kontzientzia jo arte. Haserrezko marmarioa sortu zen jendartean.

—Bakea ekartzera etorri natzaizue —esan zuen Basatiak bikiengana bihurturik—. Bakea…

Komisari Kutxazain Ordeak ez zuen gehiagorik entzun. Ataritik kanpora atera eta zenbaki baten bila ari zen telefono liburuan.

—Ez zegok bere gelan —esan zuen Bernardek—. Nirean ere ez, eta hirean ere ez. Ez Afroditeumean, ez Zentroan, ez eta Unibertsitatean ere. Nora ote daiteke joana?

Helmholtzek bizkarrak uzkurtu zituen. Ohizko biltokiren batean zain aurkituko zutelakoan itzuli ziren lanetik. Baina mutilaren arrastorik ere ez inon. Eta hori oker handia izan, zeren Miarritzera joateko asmoa baitzeukaten Helmholtzen lau lekudun kirolkopteroan. Basatia laster agertu ezik, berandu iritsi behar afarira.

—Gauden zain beste bost minututan —esan zuen Helmholtzek—. Eta ordurako agertzen ez bada...

Telefono hotsa. Hartu entzungailua eta:

—Bai, esan...

Gero pixka batean adi egon ondoren, ernegu bat jaurtiki zuen:

—Ford bere gurdian! Berehalaxe nihoak!

—Zer gertatzen da? —galdetu zuen Bernardek.

—Park Laneko neure lagun bat huan —esan zuen Helmholtzek—. Basatia han dela ziok. Agi danez, zoratu egin omen duk. Dena dela, premiazkoa duk. Ba al hator?

Elkarrekin korrika abiatu ziren azentsorerantz.

—Nola gusta dakizueke esklabu izatea? —zioen Basatiak bere bi lagunak Ospitalera sartu ziren mementuan—. Nola gusta dakizueke haur izatea? Haur, bai, haur. Txilioka eta negarra eta lerdea darizuela —gaineratu zuen senetik ere aterea, salbatu nahi zituenei berei gaizki esaka.

Deltek errezeloz begiratzen zioten.

—Bai, lerdea darizuela! —oihukatu zuen ozenki. Zeharo ahaztu zen lehengo saminez eta arrenkuraz, hain gorroto eta nazka gordina sentitzen baitzuen munstro gizax-

ka haienganako—. Ez al duzue libre eta gizon izan nahi? Ala gizatasuna eta askatasuna zer diren ere ez al dakizue? —Amorrazioak etorri itzela zemaion. Hitzak oparo zetozkion ezpainetara—. Ez al duzue konprenitzen? —esan zuen berriro. Baina inork ez zion erantzun—. Ea, bada —jarraitu zuen irribarrez—, neuk irakatsiko dizuet orduan. Neuk askatuko zaituztet, nahi ala nahi ez.

Eta ospitaleko barruko patiora ematen zuen leihoa zabal-zabalik irekirik, soma kutxatilak eskukadaka jaurtikitzen hasi zen handik behera.

Mementu batez kakizko jendetza hura isilik egon zen, harri eta larri, barka ezineko sakrilegio hari begira.

—Zoraturik zegok —marmartu zuen Bernardek, begiak lekutik irtenda—. Hilko diate. Hilko...

Honetan jendea oihuka hasi zen kolpera eta han zetorren olatu mugikor bat Basatiarenganantz.

—Lagun bekio Ford! —esan zuen Bernardek, eta begiak apartatu zituen.

—Bere buruaren lagun denari bakarrik laguntzen dio Fordek.

Eta barre-algara bat, egundoko barre-algara bat jaurtikirik, Helmholtz Watson jendartean barrena abiatu zen.

—Libreak, libreak! —oihukatu zuen Basatiak.

Eta esku batez soma jaurtikika ari zen leihotik behera eta besteaz ukabilka bere erasotzaileen aurpegi ideetan.

—Libreak!

Eta Helmholtz ikusi zuen alboan —«Helmholtz mutil ona»— ukabilka bera ere.

—Gizonak azkenez!

Eta bitartean Basatia soma jaurtikitzen eta jaurtikitzen ari zen leihoan behera.

—Gizonak, bai, gizonak!

Pozoi guztia amaitu arte. Orduan jaso zuen gorantz kutxa eta hutsik erakutsi zion jendeari.

—Libreak zarete!

Uluka, Deltek amorrazio handiagoz eraso zioten.

Nahasmendu hartan zer egin ez zekiela, Bernardek esan zuen berekiko: «Hauenak egin dik»; eta bapateko bultzadak eraginda, aurrerantz abiatu zen haiei laguntzera. Gero hobeto pentsatu eta gelditu egin zen; baina lotsaturik, beste pauso bat eman zuen. Berriro iritzia aldatu eta gelditu egin zen, ezbai lotsagarrizko hilzorian. Pentsatzen zegoen berak lagundu ezik, elkar hilko zutela, baina baita bera ere hila zitekeela laguntzerakoan. Orduan (Goretsia bedi Ford!) han agertu ziren poliziak beren maskara eta guzti, mutur luze eta begi saltaridun zerri barregarrien itxuraz.

Bernard korrika atera zitzaien bidera poliziei, besoak astinduz. Hura behintzat ihardutea zen, zerbait egitea zen. «Heldu» hots egin zuen hiru-lau adiz, gero eta indartsuago, zerbaitetan bazuela laguntzen sinestarazteko bere buruari.

—Heldu, heldu, heldu!

Poliziek apartatu zuten paretik eta beren egitekoari ekin zioten. Hiru agente, nork bere hautseztailua bizkarrean zeramala, somazko lurrunak hedatzen hasi ziren airean zehar. Beste bik Musika Sintetikozko Gailu erabilkorraren inguruan ziharduten. Beste lauk, anestesiko indartsuz kargaturiko ur pistola banaz armatuta, burrukaririk porrokatuenak jo eta txandan-txandan eraisten ari ziren xiringadaka.

—Azkar, azkar! —hots egin zuen Bernardek—. Hilko dituzte azkar ez bazabiltzate! Hilko...! Ai!

Bernarden uluez ernegaturik, polizia batek urezko pistolakada bat jaurtiki zion. Bernard segundu batzuetan albo-alboka ibili zen. Oinak hezurrik, zainik, giharrik gabe geratu zitzaizkiola zirudien, gelatinazko eta azkenez ur hutsezko habe soil bihurturik; eta paketetzar batek bezala lurra jo zuen.

Honetan Musika Sintetikozko Gailu barrutik ahots bat hasi zen hizketan. Adimenaren Ahotsa, Sentimendu Onen ahotsa. Soinu-bandaren zunbila Istiluen Aurkako Bigarren Hitzaldi Sintetikoa (Indar Erdikoa) askatuz zihoan. Existentziarik gabeko bihotz baten barrenetik zuzenean, «Ene lagunak, ene lagunak!» zioen Ahotsak hunkigarriro, hain neurrigabeko samurtasunez ahakar eginez non polizien begiak ere, euren gas-maskaren ostean, malkoz busti baitziren mementu batez.

—Zer esan nahi du horrek? —jarraitzen zuen Ahotsak—. Zergatik ez zarete zoriontsuak, zergatik ez zarete onak elkarrentzat, denok elkarrekin? Zoriontsuak eta onak —zioen behin eta berriro Ahotsak—. Bakez, bakez.

Dardartu zen, furrunda bihurtzeraino jaitsi zen, eta pixka batean mututu.

—O, zenbat desio dudan zuek zoriontsu ikustea! —hasi zen berriro gartsuki—. Zenbat desio dudan onak zaitezten! Zaitezte onak, otoi, eta…

Bi minuturen buruan, Ahotsak eta Somak egina zuten beren eragina. Begietatik negarra zeriela, Deltak elkarri musuka eta besarka ari ziren, dozena erdi biki besarkada bakarrean. Helmholtzek eta Bernardek ere gutxi falta zuten negarrez hasteko.

Administraziotik beste soma aldi berri bat ekarri zuten. Arrapaladan banatu zuten eta Ahotsaren baritono durunda samurrez, bikiak irrintzika sakabanatu ziren, bihotza zatikatuko balitzaie bezala.

—Agur, agur, ene laguntxo maiteak. Fordek salba zaitzatela! Agur, agur, ene laguntxoak!

Azkenengo Delta joan zenean, poliziak deskonektatu zuen aparatua eta Aingeru Ahotsa mututu zen.

—Portatuko al zarete erresistentziarik jartzeke? —galdetu zuen sarjentuak—. Ala anestesiatu beharko ote zaituztet?

Eta amenazuka jaso zuen bere ur pistola.

—Ez dugu erresistentziarik jarriko —erantzun zuen Basatiak, txandaka xukatuz ezpainetako ebakietatik, lepoko arramaskatik eta esku ezkerreko haginkadatik zerion odola.

Helmholtzez ere baietz egin zuen buruaz, sudurretik painelurik kendu gabe, odola barra-barra baitzerion.

Bernard itzarri berri zen eta oinak berriro mugitzen zitzaizkiola kargutuz batera, mementu huraxe hautatu zuen inork igartzeke ihes egiteko.

—Aizak, hi! —hots egin zuen sarjentuak.

Eta polizia batek, bere zerri maskaraz, gela alderik alde pasa eta bizkarretik oratu zion gazteari.

Bernard itzuli zen, haserrezko errugabetasun itxurak eman nahiez. Ihesi zihoala bera? Ezta ametsetan ere.

—Ez dakit, bada, zer nahi dezakezun niregandik —esan zion sarjentuari.

—Atxilotuen lagun haiz hi, ez al da egia?

—Ba... —esan zuen Bernardek; eta dudan jarri zen. Ez, ezin zezakeen ukatu—. Eta zergatik ez nintzen izango? —galdetu zuen.

—Zatoz, orduan —esan zuen sarjentuak.

Eta aterantz abiatu zen, ate aurrean zain zegoen kotxe zelularrerantz.

# HAMASEIGARREN KAPITULUA

Inspektorearen despatxuan sarrarazi zituzten.

—Berehalaxe dukezue hemen Bere Fordtasuna —esan zuen Gamma etxezainak.

Eta bakarrik utzi zituen.

Helmholtzek barreari ekin zion.

—Honek epaiketa bat baino, kafeina ur festa bat zirudik. —Eta besaulki pneumatikorik luxuzkoenean etzan zen luze—. Aupa, Bernard —gaineratu zuen, bere lagunaren aurpegi kezkatiaz erreparatzean.

Baina Bernard ez zegoen adorezko hitzik hartzeko. Ezer erantzun gabe, Helmholtzi begiratu ere egin gabe, despatxuko aulkirik ezerosoenean eseri zen, apropos hautatu zuena botere nagusien kontrako amorrazioa nolabait baretzeko itxaropen ilunez.

Bitartean, Basatia alderik alde bueltaka zebilen despatxuan egon ezinez, erdi arretaz dena ikusmiratuz: alasetako liburuak, zinta ozeneko erroiluak eta irakurgailuen bobinak, bakoitza bere zuloan jarriak. Mahai gainean, leihoaren ondoan, liburu lodi bat zetzan larru beltz artifizia-

lez koadernatua. Liburu azalean T handiak ageri ziren urrez inprimatuak. Johnek hartu eta ireki zuen. «Nire Bizitza eta Lana» Gure Fordek egina. Liburua Detroiten argitaratu zuen Forden Jakintza zabaltzeko Elkarteak. Begiraldi nagi bat eman zion, han-hemenka zer edo zer irakurriz. Baina liburu hark bost axola ziolako konklusioa atera zuenerako, hara non atea ireki zen eta Mendebal Europako Mundu Inspektorea sartu pauso azkarrez.

Mustafa Mondek luzatu zien eskua hiru gizonei; baina Basatiari zuzendu zitzaion esanez:

—Gure zibilizazioa, beraz, ez omen zaik askorik gustatzen, Mr. Basati —esan zion.

Basatiak begiratu zion. Erabakia hartua zeukan gezurretan aritzeko, fanfarreriak jaurtikitzeko edo tutik ere ez esateko. Baina Inspektorea hain adikor eta umoretsu zetorrela ikustean, egia esatea erabaki zuen argi eta garbi.

—Ez —eta buruari eragin zion.

Bernard ikaraz jarri zen eta izuturik begiratu zion. Zer pentsatuko ote zuen Inspektoreak? Zibilizazioa ez zaiola gustatzen dioen gizon baten laguntzat agertu beharra ikaragarria zen noski eta argi esan ere, noren eta Inspektorearen beraren aurrean gainera.

—Baina aizak, John… —hasi zen Bernard.

Baina Mustafa Monden begirada zorrotz batek mutu utzi zuen kolpera.

—Egia esan —aitortu zuen Basatiak— badago gauza ederrik hemen. Musika hau dena airean, esaterako…

—*Batzuetan milaka tresna ozen dabilzkit furrundaka belarrietan, besteetan ordea, ahotsak dira…*

Basatiari bapateko atseginez argitu zitzaion begitartea.

—Zuk ere irakurri al duzu? —galdetu zuen—. Nik uste nuen hemen, Ingalaterran, inork ez zuela liburu hori ezagutzen.

—Ia inortxok ere ez. Neu nauk gutxi-gutxietariko bat. Debekatuta zegok, konprenitzen al duk? Baina nola neu naizen legeen egile, hautsi ere egin zitzakeat. Zigorrik gabe, Mr. Marx —gaineratu zuen, Bernardengana itzulirik—. Beldur nauk, ordea, hik ezin duala horrelakorik egin.

Bernard beherago amildua zen oraindik bere zorigaitzean.

—Baina zergatik dago debekatuta? —galdetu zuen Basatiak.

Shakespeare irakurria zuen gizon bat ezagutzeak eman zion bihozkadak gainetiko guztia ahaztarazi zion kolpera.

Inspektoreak bizkarrak jaso zituen.

—Antzinakoa delako. Horra arrazoi nagusia. Hemen antzinako gauzek ez zigutek ezertarako balio.

—Ederrak izanik ere ez?

—Ederrak direnean batez ere. Ederra lilurakor duk eta hemen ez diagu nahi jendeak antzinako gauzen lilurarik senti dezan. Gauza berriak gusta dakizkion nahi diagu.

—Gauza berriak, ordea, zentzugabekeria nazkagarriak baitituzu! Helikopteroa baizik ikusten ez den eta aktoreak elkar musuka publikoak sentitzen dituen pelikulatzar horiek bezala! —Johnek keinu bat egin zuen—. *«Akerrak eta tximinoak»*.

Oteloren hitz hauexetan aurkitzen zuen bere arbuio eta gorrotoa adierazteko bide egoki bakarra.

—*Dena dela, animalia mantsoak* —marmartu zuen Inspektoreak, parentesi gisa.

—Zergatik ez diezu Otelo irakurrarazten itsuskeria hauen ordez?

—Esana diat: antzinakoa delako. Gainera ez liakete konprenituko.

Halaxe zen, bai. John gogoratu zen nolako barreak egin zituen Helmholtzek Romeo eta Julieta irakurtzean.

—Beno, ba, orduan —esan zuen isilaldi baten ondoren— zerbait berria, Oteloren antzekoa eta haiek konprenitzekoa.

—Horixe da hain zuzen, denok idatzi nahiez ibili garena —esan zuen Helmholtzek, bere isilaldi luzea mozturik.

—Eta horixe duk hain zuzen, zuek sekula idatziko ez duzuena —esan zuen Inspektoreak—. Zeren Oteloren antzeko zerbait baledi, ez likek inork konprenituko, berririk berriena izanik ere. Eta berria izatekotan, ez likek Oteloren antzik.

—Zergatik ez?

—Bai, zergatik ez? —berresan zuen Helmholtzek. Berak ere ahazturik zituen ia egoera hartako errealitate latzak. Larri-ikaraz zurbilik, Bernardek bakarrik gogoratzen zituen. Besteak, ordea, ahazturik zeuden.

—Zergatik ez?

—Gure mundua ez delako Oteloren mundua. Ez zegok kotxeak egiterik, altzairu gaberik. Ez zegok tragediak sortzerik, egongaiztasun sozial gaberik. Gaur mundua egonkorra duk. Jendea zoriontsu duk. Nahi duen guztia zeukak eta eduki ez dezakeenik ez dik inoiz desiratzen. Gustora zegok; salbu zegok; inoiz ez zegok gaixorik; ez duk heriotzaren beldur; grina eta zahartzea zer diren ere ez zekik. Ez zegok emazterik, ez seme-alabarik, ez amodio sendoegirik. Gure jendea egokiturik dagoen bezala

egonik, ezin zezakek obratu, obra dezakeen moduan baizik. Eta okerrik gertatuko balitz hor zegok soma beti. Hik, Mr. Basati, libertatearen izenean leihotik behera jaurtiki duan soma, alegia. Libertatea! —Inspektoreak barre-karkara bat bota zuen—. Pentsatzea ere Deltek badezaketela libertatea zer den jakin! Eta badezaketela Otelo konpreni! Baina mutil!

Basatia isilik egon zen apur batean.

—Hala ere —ekin zion temati—, Otelo ona duzu, Otelo hobea duzu sentsoramako pelikula horiek baino.

—Hala duk, noski —baieztatu zuen Inspektoreak—. Baina horixe duk egonkortasunaren truke ordaindu behar dugun prezioa. Bietarik bat hautatu beharra zegok, edo zoriona, edo jendeak behinola zioen arte bikain hura. Guk arte bikaina bazter utzi diagu. Eta sentsorama eta lurrin organoa jarri dizkiagu haren ordez.

—Ez daukate ordea, inolako mezurik.

—Bazeukatek, bai, mezua, baina berena. Publikoarentzat sentsazio atsegingarri pila baten mezua.

—Argumentuak behintzat tenteltzarren batek idatziak dira.

Inspektoreak barreari ekin zion.

—Ziri ederra sartu diok hire adiskide Mr. Watsoni, berau baita gure emozio ingeniaririk gorenetakoa.

—Arrazoi osoa du —esan zuen Helmholtzek itzaltsuki—. Zeren izan ere tentelkeria hutsa baita guzti hau. Zer esanik batere ez dagoenean idaztea…

—Horixe, noski. Baina horretarako talentua behar. Hik ahalik eta altzairurik gutxienez lortzen duk kotxegintza; ia sentsazio hutsez artegintza.

Basatiak buruari eragin zion.

—Izugarri deritzot nik guzti honi.

—Hala duk izan ere. Egiazko zorionak askozaz tristeago ematen dik beti zorigaitzaren alderdien ondoan. Eta jakina, egonkortasuna ez duk inoiz egongaiztasuna bezain ikusgarri, ez eta gutxiagorik ere. Eta guztiaz aserik egoteak ez dik zorigaitzaren kontrako burruka porrokatuak duen lilurarik, ez eta tentazioaren edo grina fatal baten edo duda baten kontra jokatzeak duen bitxitasunik ere. Zorionak ez zeukak inoiz arrandiarik.

—Ezezkoan nago —esan zuen Basatiak isilaldi baten ondoren—. Baina biki horiek bezalako izugarrikeriak asmatzeraino behar al da iritsi? Izugarriak dira!

—Baina balio-baliokoak. Ikusten diat gure Bokanowsky sailak ez zaizkiala begiko. Baina jakin ezak berak direla gainetiko guztiari eusten dioten zutabeak. Berak dituk Estatuaren abioi-kohetea orekatzen dutenak bere abiada bortitzean.

Ahots sakon hark belarriak zulatzeraino bibratzen zuen; esku keinulari hark aldenezinezko makinaren indarra eta izpiritua ordezkatzen zituela zirudien. Mustafa Monden hizlaritza ia-ia eredu sintetikoen parekoa zen.

—Behin baino sarriago galdetu izan diot neure buruari —esan zuen Basatiak— zergatik produzitzen dituzuen hauen moduko izakiak, zeuen gustokoak egin ahal izanik ontzi beldurgarri horietan. Zergatik ez, ahal duzuenez gero, Alfa-Bikoitz-Gehiagoak bakarrik fabrikatu?

Mustafa Mondek barre ederrak egin zituen.

—Ez dugulako nahi lepoa motz diezaguten —erantzun zuen—. Guk biak sinesten dizkiagu, zoriona eta egonkortasuna. Alfa hutsezko gizarteak egongaitza eta zorikabe izan behar dik nahitaez. Pentsa ezak Alfa hutsezko fabrika bat: denak indibiduo bereziak eta ahaidetasunik gabeak, eta —neurri batean—, libreki hautatzeko

eta erantzukizunak hartzeko kapaz direnak. Pentsa ezak zer litzatekeen hori! —esan zuen berriro.

Basatia saiatu zen pentsatzen, baina alferrik.

—Absurdoa duk. Alfa bezala dekantatua, Alfa bezala egokitua izan den gizon bat zoratu egingo huke, Epsilon erdi ipotx baten lanak egin behar balitu. Alfak zeharo sozialduak izan zitezkek, baina bakarrik Alfei dagokien lana egiten baldin badute. Epsilon bati bakarrik eska zekiokek Epsilon sakrifiziorik, zeren horiek ez baitira harentzàt sakrifizio. Erresistentzia izpirik ere ez dik jartzen. Bere egokimenduak ipini zizkiok nondik korritu errailak. Ez zezakek galerazi. Aldez aurretik zegok horretara kondenatuta. Dekantatua izanez gero ere, ontzi barruan segitzen dik: ontzi ikusgaitz bat haurren eta enbrioien hertsikeria guztiekin. Gu denok ere, jakina —jarraitu zuen pentsakor Inspektoreak— ontzi baten barruan bizi izanak gaituk. Baina Alfen ontziak, erlatiboki hitz eginez, izugarri handiak dituk. Guk gorriak ikusi beharko genizkiake, leku meharragoan sartuko bagintuzte. Ezin zitekek klase goikoen Champagne artifizialik isuri kasta behekoen ontzietan. Teoriaz ere bistakoa duk hori. Baina teoriaz gainera, praktikan ere garbi frogatua zegok. Txipreko esperimentuaren ondorioa biribila izan huan horretaz.

—Zer izan zen, bada, esperimentu hura? —galdetu zuen Basatiak.

Mustafa Mondek irribarre egin zuen.

—Beno, nahiago baldin baduk, dei ezak berrontzialdiko esperimentua. Forden 73. urtean hasi huan. Inspektoreek Txipreko uhartea arras hustu ziaten aurreko biztanle guztietatik eta berriro kolonizatu, hogeita bi milako Alfa labaldi bat apropos aterarik harako. Nekazal eta industri tresneria guztia eman zietean eta berak berenez

konpon zitezen utzi. Esperimentu haren ondorioak zehazki bete zizkian susmo teoriko guztiak. Ez ziaten lurra behar bezala landu; grebak noiznahi fabriketan, legerik bete ez, agindurik obeditu ez. Lan apaletara destinaturik zeuden pertsonek satorkerietan ziharduten etengabe kargu onak harrapatzearren, eta goiko karguetan zeudenek ere beste hainbeste egiten ziaten kargu haiei nola edo hala eustearren. Sei urteren buruan egundoko gerra zibilean nahaspilaturik hituan. Hogeita bi mila biztanletatik hemeretzi mila hilak zirenean, bizirik geratu zirenek, denek aho batez eskatu zietean Mundu Inspektoreei har zezatela berriro uharteko aginpidea, eta hala egin ziaten. Eta hala akabatu huan munduan izan den Alfa gizarte bakarra.

Basatiak hasperen sakona egin zuen.

—Populaziorik onena —esan zuen Mustafa Mondek— izeberren antzekoa duk: bederatzitik zortzi ur azalaren azpitik, eta bat bakarra gainetik.

—Eta zoriontsu al dira ur azalaren azpitik daudenak?

—Gainetik daudenak baino zoriontsuago, noski. Hire bi lagunok baino zoriontsuago, esate baterako.

Eta Helmholtz eta Bernard seinalatu zituen.

—Beren lan zatar eta guzti ere bai?

—Zatarra? Berek ez zeukatek, bada, zatartzat. Aitzitik, gustoko zaiek. Lan arina duk, erraza, haurrena, zazpi ordu t'erdiko lan leuna, nekegabea, eta gero soma errazioa, jolasak, kopulazio librea eta sentsorama. Zer gehiagorik eska dezakete? Bai, jakina —gaineratu zuen—, lanordu gutxiago eska zezakeate. Eta eman ere emango genieake. Teknikaz txit erraza huke kastabeheko langileen lanaldia hiruzpalau ordutara jaistea. Baina zoriontsuago ote lirateke horrela? Ez, ez hituzke inola ere. Mende eta erditik gora duk esperimentua egin zutela. Irlanda osoan

lau orduko lanaldia ezarri ziaten. Zer ondorio? Iskanbila franko eta soma kontsumoan gorakada galanta; besterik ezertxo ere ez. Hiru ordu t'erdi extra haiek ez hituan, ez, zorion iturri gertatu. Jendeak oporrak hartu behar haietaz libratzeko. Asmaketa Bulegoa planez josita zegok lana gutxitzeko eta aurrezteko. Milaka plan horretarako. —Mustafa Mondek gorputz osoari eragin zion—. Zergatik ez ditugun planok indarrean jartzen? Langileen onagatik. Astakeria huke asti ordu gehiago ematea beren kalterako. Nekazaritzan ere berdin-berdin gertatzen duk. Nahi baldin bagenu, jateko guztiak sintetikoki egin genitzakek. Baina ez diagu nahi. Nahiago diagu populazio heren bat lurrak ematen duenetik bizi dadin. Beren onarren, zeren denbora gehiago pasarazten baitu lurretik jatekoa ateratzeak, fabrika batetik baino. Gainera gure egonkortasuna jagon beharra zeukeagu. Ez diagu aldakuntzarik nahi. Edozein aldakuntza amenazu bat duk egonkortasunerako. Horra beste arrazoi bat asmakizun berriekin kontuz ibiltzeko. Zientzia soileko aurkikuntzak ere subertsio bide dituk funtsean. Zientzia bera ere etsaitzat jo beharra zeukeagu inoiz. Zientzia bera ere bai, noski.

Zientzia? Basatiaren betoskoa ilun jarri zen. Hitza ezagutu bai, egiten zuen. Baina ezin zukeen esan zer esan nahi zuen zehazki. Shakespearek eta herriko zaharrek ez zioten sekula aipatu eta Lindagandik zirriborrozko aipuren bat edo beste entzuna zen soilik: zientzia helikopteroak egiteko zerbait zen, Arto Dantzak barregarritzat harrarazten zituen zerbait, gaixotasunetatik eta haginak galtzetik zaintzen eta jagoten duen zerbait. Izugarrizko ahaleginak egin zituen zer esan nahi zuen aditzeko.

—Bai —jarraitu zuen Mustafa Mondek— egonkortasunaren kostoari jartzeko beste kargu bat duk hori. Ez

duk artea, ez, zorionarekin ezin ados daitekeen bakarra, zientzia bera ere baizik. Zientzia arriskugarria duk; horregatik ardura bereziaz kateaturik eta bozaturik eduki beharra diagu.

—Zer? —esan zuen harriturik Helmholtzek—. Baina beti ari gara eta esaka zientziak egiten duela dena! Axioma hipnopedikoa da hori!

—Astean hiru bider hamahiru urtetik hamazazpira bitartean —esan zuen Bernardek.

—Eta Eskolan zientziaren alde egin ohi dugun propaganda guztia…

—Bai, baina nolako zientzia? —galdetu zuen Mustafa Mondek isekaz—. Zuek ez daukazue hezkuntza zientifikorik eta, beraz, ez dezakezue iritzirik eman. Ni behinola fisiko ona izana nauk. Onegia, noski: laster igarri nian gure zientzia delako guzti hau sukaldaritza liburu bat besterik ez dela, sukaldaritzari buruz inork dudan jar ez dezakeen teoria ortodoxoa duena eta errezeta mordo bat, inork batto ere erantsi ez diezaiokeena sukaldari nagusiaren aparteko baimenik gabe. Neu nauzue orain sukaldari nagusia. Baina lehenago sukalde-mutil gazte eta nonzerberri bat izan ninduan. Eta saltsaren batzuk neuk neuretara egiten hasi ninduan. Sukaldaritza heterodoxoa, sukaldaritza debekatua. Izatez, benetan zientzia pitin bat.

Mustafa Mond isilik geratu zen.

—Eta zer gertatu zen? —galdetu zuen Helmholtz Watsonek.

—Zuei, gazteoi, laster gertatuko zaizuena bera gertatu zitzaidaan ia. Ia uharte batera bidali ninduten.

Hitz hauek konkorturik utzi zuten Bernard, bortxaz dardarka jartzen zelarik kolpera.

—Neu jaurtikiko nautela uharte batera?

Salto batez zutitu zen aulkitik, despatxua presaka iragan zuen alderik alde eta besoei eraginez. Inspektorearen aurrez aurre geratu zen.

—Zuk ezin nazakezu erbesteratu. Nik ez dut ezertxo ere egin. Besteak izan ziren. Zin dagit besteak izan zirela. —Eta Helmholtz eta Basatia seinalatu zituen salati—. Mesedez, ez nazazu, otoi, Islandiara bidali! Promes dagit nahi duten guztia egingo dudala. Emaidazu beste aukera bat. —Eta negarrari eman zion—. Hauek dute erru guztia —zotinka ari zen—. Islandiara ez! Mesedez, Berorren Fordtasuna, mesedez...!

Eta doilorkeriarik doilorrenez Inspektorearen aurrean belaunikatu zen.

Mustafa Mondek jaikiarazi nahi zuen, baina Bernardek bere doilorkerian zirauen, hitza eta pitza zeriola barra-barra. Azkenez Inspektoreak bere laugarren idazkariari hots egin behar izan zion.

—Ekar itzak hiru gizon —agindu zuen— eta daramatela Mr. Bernard logela batera. Eman diezaiotela somako baporaldi on bat eta gero etzanaraz dezatela eta bakarrik utzi.

Irten zen laugarren idazkaria eta uniforme berdedun hiru morroi bikirekin itzuli zen. Garrasika eta zotinka oraindik, atera zuten Bernard despatxutik.

—Edonork esango likek urkamendira edo daramatela, —esan zuen Inspektoreak, atea itxi zutenean—. Berez, zentzu apurrik balu, aise konprenituko likek zigor hau sari bat dela. Uharte batera bidaliko diate. Alegia, munduan diren gizonik eta emakumerik interesgarrienak ezagutzeko tokira bidaliko diate. Zergatik edo hargatik beren indibiduotasunaren kontzientzia gehiegi hartu duten pertsonak, gizartean bizi ahal izateko. Ortodoxiaz konforme ez

dauden eta berezko ideiak dituzten pertsonak. Hitz batez, norbait diren pertsonak. Ia inbidia ematen didak, Mr. Watson.

Helmholtzek barreari eman zion.

—Orduan, zergatik ez zaude zeu ere uharte batean?

—Azken batean, hauxe nuelako nahiago —erantzun zion Inspektoreak—. Bietarik bat hautatzea eman zidatean: edo uharte batera bidali, han neure zientzia soilari ekiten jarraitzeko, edo Inspektoreen Kontseiluko egin, egunen batean Inspektore izateraino iristeko etorkizunez. Bigarren hau hautatu nian eta zientzia bertan behera utzi.

Isilunetxo baten ondoren, gaineratu zuen:

—Inoiz zientziaren falta handia sentitzen diat. Zoriona maisu txit gogorra duk, besteen zoriona batez ere. Egia baino ere maisu askozaz latzagoa duk zoriona, norbera hartarako egokitua izan ez bada behintzat.

Hasperen egin eta isilik geratu zen berriro. Gero honela jarraitu zuen tonu biziagoz:

—Beno, eginbeharra egin behar duk. Ez zegok nork bere gustoei kasu egiterik. Egia axola zaidak. Zientzia maite diat. Baina egia amenazu bat duk, eta zientzia arrisku publiko bat. Ongarri izan zaigun bezain arriskugarri. Historiako orekarik egonkorrena eman ziguk. Txinako oreka kili-kolo hutsa huan gurearen aldean. Antzinako matriarkatuek ere ez zeukatean guk adinako tinkotasunik. Zientziari eskerrak, berriro diot. Baina ezin zezakeagu permititu zientziak bere obra desegin dezan. Honexegatik mugatzen diagu hain zehazki zientziako ikerketaren norainokoa; honexegatik egon ninduan uharte batera bidalia izan hurran. Mementuko arazorik hurbilenez bakarrik ardura dadila permititzen zioagu zientziari. Gainetiko ikerketa guztiak erne berritan hiltzera kondenatuak zeudek.

Xelebrea duk —esan zuen geralditxo baten ondoren— Gure Forden garaiko jendeak zientziaren aurrerapenaz zer idazten zuen irakurtzea. Agi danez, permiti zitekeela uste ziaten zientziak epe gabe aurreratuz segi zezan, besterik ezer kontuan edukitzeke. Jakitea jotzen ziaten onik handientzat, egia baliorik nagusientzat. Gainetiko guztiari bigarren mailako eta menpeko zeritzoaten. Egia esan, orduantxe ere ideiak aldatzen hasiak zeudean. Gure Fordek berak ere anitz egin zian egiaren eta ederraren omena erosotasunak eta zorionak har zezaten. Masako produkzioak nahitaez eskatzen zian ideien funtsezko aldakuntza hau. Zorion unibertsala duk gurpilak eta engranaiak etengabe martxan ibilarazten dituena; ez egia eta edertasuna. Eta izan ere, masek aginpide politikoa hartzen zutenean, zorionak gehiago axola ziean egiak eta edetasunak baino. Hala eta guztiz ere, zilegi huan artean ikerpen zientifikoari mugarik jarri gabe jarraitzea. Jendea egiaz eta edertasunaz mintzo huan ondasunik gorenak balira bezala. Honetan Bederatzi Urteko Gerratea etorri huan. Honexek aldarazi ziean leloa. Zertarako dira egia, edertasuna edo jakintza, antrax-bonbak eztandaka ari diren bitartean? Bederatzi Urteko Gerratearen ostean, zientziari oztopoak jartzen hasi hituan. Ordurako jendea gertu zegoan jada beren grinak muga eta erregula zitzaten. Edozer bakea edukitzekotan. Eta harrez gero beti eduki diagu kontrola. Egia, jakina, galtzaile atera duk. Gauzek beren prezioa zeukeate. Zorionak ere bere prezioa zeukean. Eta hik ere ordaindu beharra dukek, Mr. Watson; ordaindu beharra dukek ederzaleegi haizelako. Neu ere ederzaleegi ninduan; eta ordaindu behar izan nian.

—Baina zu ez zinen uharte batera joan —esan zuen Basatiak, isilaldi luzea hautsirik.

—Honelaxe ordaindu nian nik. Zorionaren zerbitzari izatea hautatuz. Besteen zoriona, ez neurea. Zorte handia duk —ekin zion geraldi baten ondoren— munduan hainbeste uharte egotea. Ez zekiat nola konponduko ginatekeen uharterik gabe. Gasezko ganbarara-edo eraman beharko genituzkeela uste diat. Eta, aizak, Mr. Watson, gustatuko al litzaiake klima tropikala? Markesak, esaterako, edo Samoa? Zerbait tonikoagorik beharbada?

Helmholtz zutitu zen bere pneumatikotik.

—Klimarik txarrena gustatuko litzaidake —erantzun zuen—. Klima txarrean hobeto idatz daitekeela uste dut. Haizetsua eta ekaiztsua baldin bada, esaterako...

Inspektoreak baiezkoa egin zuen buruaz.

—Atsegin zaidak hire aldartea, Mr. Watson. Txit atsegin zaidak benetan ere. Ofizialki gaitzesten dudan adina. —Irribarre egin zuen—. Zer deritzek Falkland Uharteei?

—Bai, egoki zazkidala uste dut —erantzun zuen Helmholtzek—. Eta orain, gaizki ez baderitzozu, Bernard gaixoa nola dagoen ikustera noa.

# HAMAZAZPIGARREN KAPITULUA

—Artea, zientzia... Prezio handiegia ordaindu duzuela uste dut zorionaren truke —esan zuen Basatiak, bakarrik geratu zirenean—. Ezer gehiagorik, akaso?

—Ba... erlijioa bai, behintzat —erantzun zuen Inspektoreak—. Bederatzi Urteko Gerrate aurretik bahuan zerbait... Jainkoa zeritzana. Barka, ahazturik neukean: uste diat hik ondo dakiala Jainkoaren berri.

—Ba...

Basatia dudan jarri zen. Pozik esango zukeen zerbait bakardadeaz, gauaz, ilargipean zurbilik hedatzen zen lautadaz, heriotzaz... Pozik hitz egingo zukeen guzti haietaz; baina ez zegoen hitz egokirik. Ez eta Shakespearerengan ere.

Bitartean Inspektorea despatxuko beste aldera joana zen eta diru-kutxa handi bat zabaltzen ari zen, liburuen apalean, horman sarturik zegoena. Ireki zuen ate astuna. Barruko erdi itzalean bilaka, Inspektoreak esan zuen:

—Gai horrek beti erakarri du nire arreta. —Liburu lodi beltz bat atera zuen kutxatik—. Hau, adibidez, ez duk inoiz irakurri.

Basatiak hartu zuen liburua.

—*Biblia Saindua, Itun Zaharra eta Berria* —irakurri zuen altu.

—Eta hau.

Azalik gabeko liburu txiki bat zen.

—*Kristoren Imitazioa.*

—Ez eta hau ere.

Eta beste liburu bat eman zion.

—*Erlijio Esperientziaren aldakuntzak,* William James-ena.

—Eta oraindik askozaz gehiago zeuzkat —jarraitu zuen Mustafa Mondek berriro eseririk—. Antzinako liburu pornografikoen bilduma osoa. Jainkoa kutxan eta Ford alasetan.

Eta bere liburutegi ofiziala seinalatu zuen irribarrez: liburuz beteriko alasak, bobinazko eta erroilu ozenezko ilarak.

—Baina zuk Jainkoa nor den baldin badakizu, zergatik ez diezu besteei agertzen? —galdetu zuen Basatiak haserre bizitan—. Zergatik ez dizkiezu irakurrarazten Jainkoaz tratatzen duten liburu hauek?

—Otelo uzten ez diedan arrazoiagatik beragatik: antzinakoak direlako. Duela ehundaka urteetako Jainkoaz tratatzen dutelako. Ez oraingo Jainkoaz.

—Baina Jainkoa ez da aldatzen.

—Gizonak bai, ordea.

—Eta zer axola du horrek?

—Alde handia zegok hor —esan zuen Mustafa Mondek. Jaiki berriro eta kutxara hurreratu zen—. Bahuan gizon bat Newman kardinalea zeritzana —esan zuen—. Kardinale bat —azaldu zuen parentesi gisa— Artxitxantre Komunal bat bezalatsukoa huan.

—*Nik, Pandulfok, Milan ederreko kardinale naizen honek*... Irakurria dut zerbait honelakorik.

—Bai noski. Beno, esaten niharduen bezala, bahuan gizon bat Newman kardinalea zeritzana. A, hemen zegok haren liburua! —Atera zuen kutxatik—. Eta harira datorrenez gero, beste hau ere aterako diat. Maine de Biran zeritzan gizon batena duk. Filosofo bat huan. Jakingo duk zer zen filosofo bat.

—Zeru-lurretan diren baino gauza gutxiagotan amets egiten duena —esan zuen Basatiak berehalaxe.

—Horixe. Geroago irakurriko diat filosofo honek amets egin zuen gauza bat. Oraingoz, entzun ezak zer zioen antzinako Artxitxantre komunal honek. —Ireki zuen liburua paper zatitxo batek markatzen zuen lekutik eta irakurtzen hasi zen—: «Ez gara geureago daukaguna geure den baino. Ez genuen geuk egin gure burua; ez daukagu, beraz, aginpiderik gure buruengan. Ez gara gure buruen jabe. Jainkoaren jabegoa gara. Ez al dago gure zoriona gauzak honela ikustean? Ba al da zorionik edo kontsolamendurik geure garela uste izatean? Baliteke gazteek eta edukitsuek hala uste izatea. Baliteke hauek uste izatea handia dela gauzak haien nahikara egitea, inorengandik ez dependitzea, ikusten ez den ezertan pentsatzerik ez edukitzea, etengabe aitortu beharrak, etengabe otoitz egin beharrak, etengabe nork bere burua beste bati buruz jarri beharrak ematen duen neketik libre egotea. Baina denbora joan ahala, hauek ere, beste gizon guztiek bezala, igarriko dute independentzia ez dagoela gizonarentzat egina, egoera antinatural bat dela, pixka batez iraun dezakeena, baina ez gaitzake azkeneraino salbu eraman...» —Mustafa Mondek geraldi bat egin zuen. Utzi zuen lehenengo liburua eta beste bat harturik, orri batzuk pasa zituen—.

Entzun ezak hau, adibidez —esan zuen; eta bere ahots astunez irakurtzen hasi zen berriro—. «Gizona zahartu egin da. Bere baitan sentitzen du ahultasunaren, nekearen, ondoezaren sentsazio radikal hura, zahartzaroari berari datxekiona; eta hala sentituz gero, uste ohi du gaixorik dagoela; bere burua engainatzen du egoera hura kausa partikularren bati dagokiola pentsatuz, hartatik, gaixotasun batetik bezala, sendatuko delakoan. Nolako zakur ametsak! Gaitz hau zahartasuna bera baita; eta gaitz ikaragarria noski. Diotenez, heriotzaren eta heriotza ostekoaren beldurra omen da gizona, zahartu ahala, erlijiora bultzatzen dituena. Baina neure esperientziak sinestarazi dit —beldurkeria eta ameskeria horietaz aparte— erlijio sentimendua zabalduz joan ohi dela, irudimena eta zentzuak moteldu ahala eta bizitasuna galdu ahala. Orduan gure arrazoimenak bideak libreago aurkitzen ditu bere lanerako, libre aurkitzen da lehen harrapaturik zeukaten irudi, desio eta distrakzioetarik. Eta orduan horra Jainkoa agertzen, laino baten ostetik bezala. Gura arimak argi guztien iturburua sentitzen eta ikusten du, eta hartara bihurtzen da. Iturburu hartara bihurtzen da, berez eta derrigorrez. Zeren, nola orain, sentsazio-mundu hura biziarazten eta liluragarritzen zigun guztia urruntzen hasi baita guregandik, nola orain fenomenozko existentzia ez baita finkatzen kanpoko edo barruko inpresioetan, zerbait iraunkorrean finkatu beharra sentitzen dugu, hutsik eman ez diezagun zerbaitetan, errealitate edo egia absolutu eta hilezkorrean. Bai, nahi eta ez Jainkoarenganantz bihurtzen gara; zeren erlijio sentimendua hain garbi eta goxo baitzaio sentitzen duen arimari, non gainetiko galtze guztiak kitatzen baitizkigu». —Mustafa Mondek itxi zuen liburua eta bere besaulkian etzan zen patxadan—. Zeru-lurretako anitz

gauzetarik bat, filosofo hauek amets egin ez zutena, hauxe duk —eta keinu zabal bat egin zuen eskuaz—: Geu noski, gaurko mundua... «Gaztetasuna eta ugaritasuna kontserbatzen dituzun heinean bakarrik izan zaitezke Jainkoarengandik independiente. Independentziak ez zaitu azkenaraino salbu eramango». Hona, bada, gaur azkeneraino kontserba ditzakegula gaztetasuna eta ugaritasuna. Zer ateratzen da hortik? Bistan zegok: bagaitezkeela Jainkoarengandik independiente izan. «Erlijio sentimenduak gainetiko galtze guztiak kitatzen baitizkigu». Hona, ordea, guk ez dugula kitatu beharrik, ez baitugu izan galtzerik. Erlijio sentimendua, bera, hutsala duk. Zergatik gara gazte desioen ordezko bila ibiliko, inoiz ez baitzaigu gazte desiorik falta? Zertarako dibertsioen ordezkorik, azken-azkenera arte baitiraugu antzinako huskerien gozamenean? Zertarako behar dugu atsedenik, gure gogoei eta gorputzei ekina atsegin zaien artean? Zer kontsolamendu behar dugu, soma baitaukagu? Zertarako bilatu ezer mugiezkorrik, ordena soziala baitaukagu?

—Orduan Jainkorik ez dagoela uste al duzu zuk? —galdetu zuen Basatiak.

—Ez, seguru asko Jainkoren bat badagoela uste diat nik.

—Orduan zergatik...?

Mustafa Mondek moztu zion esatekoa.

—Baina gizon ezberdinei ezberdinki agertzen zaien Jainko bat. Denbora aurremodernoetan liburu hauek dioten bezala agertu huan. Gaur, ordea...

—Nola agertzen da gaur? —galdetu zuen Basatiak.

—Ba, ausentzia bat bezala agertzen duk; egon ere ez balego bezala.

—Hori zeuen errua duzue.

—Esak zibilizazioaren errua dela. Jainkoa ez duk elkargarri makinismoarekin, medikuntza zientifikoarekin edo zorion unibertsalarekin. Hautatu beharra zegok. Gure zibilizazioak makinismoa, medikuntza eta zoriona hautatu dizkik. Horregatik liburu hauek segurantza kutxa batean gorderik eduki behar dizkiat. Itsuskeria hutsa dituk. Jendea nazkatu egingo huke, baldin…

Basatiak moztu zion.

—Baina ez da *naturala* Jainko bat badela sentitzea?

—Baina jendea orain inoiz ez zegok bakarrik —esan zuen Mustafa Mondek—. Bakardadea gorrotarazten zioagu. Hala eratzen zieagu bizimodua non ez baitute inoiz bakarrik egoterik.

Basatiak tristuraz baieztu zuen buruaz. Malpaisen anitz sufritu zuen, herriko elkar ekintzetatik baztertzen zutelako. Londres zibilizatuan ere anitz sufritu beharra zuen, ez zuelako inoiz elkar ekintzetatik apartatzerik, ez zuelako inoiz bakarrik egoterik.

—Gogoratzen al zara *Errege Lear*-en zati hartaz? —esan zuen azkenez Basatiak—: «Jainkoak zuzenak dira eta gure atseginezko bizioak geure zigorgailu bihurtzen dituzte; zu sortarazi zintuen toki ustel eta ilunak bi begiak galarazi zizkion»; eta Edmundok erantzuten dio, gogora zaitez, zauriturik eta azkenetan dagoela: «Egia diozu; egia da hori. Gurpilak buelta osoa eman du. Hona hemen ni». Zer diostazu honetaz? Ez al dirudi badagoela Jainko bat gauzak eratzen dituena, zigortzen eta saritzen duena?

—Bai? —galdetu zuen halaber Inspektoreak—. Egin dezakek nahi adina bekatu goxo eme neutro batekin, ez baitukek arriskurik haren alabaren maitaleak begiak atera diezazkian. «Gurpilak buelta osoa eman du. Hona hemen ni». Baina non ote legoke Edmundo gaur? Butaka pneu-

matiko batean eseririk legokek, beso bat neskatxa baten gerri bueltan, hormona sexualezko txiklea murtxikatuz, eta sentsoramari begira. Jainkoak zuzenak dituk. Dudarik ere ez. Baina Jainkoen legedia gizartea antolatzen duten gizonek diktatua duk azken batez. Probidentziak gizonengandik hartzen dizkik aginduak.

—Ziur al zaude horretaz? —galdetu zuen Basatiak—. Horren ziur al zaude aulki pneumatikoko Edmundo ez dela izan odolustutzen eta hiltzen ari den benetako Edmundo bezain gogorki zigortua? Jainkoak zuzenak dira. Ez ote dituzte gero atseginezko bizio horiexek erabili hura degradatzeko erremintatzat?

—Zergatik degradatu, ordea? Hiritar zoriontsu, langile eta ondasunen kontsumatzaile den aldetik, perfektoa duk. Jakina, gurea ez beste eredu bat aukeratzen baduk, esan dezakek beharbada, degradatua izan dela. Baina hori argudiatu egin beharko duk. Ez dezakek Golf Elektromagnetikoan joka, Pilota Zentrifugoko legeen arabera.

—Baina kemena ez datza norberaren borondatean —esan zuen Basatiak—. Kemenaren estimazioari eta duintasunari eutsi behar zaio estimagarri delako nola berenez, hala tasatzailearen ustez.

—Ixo, ixo —protestatu zuen Mustafa Mondek—. Ez al deritzak urrunegi hoala?

—Zuek Jainkoarengan pentsatuko bazenute, ez zenukete utziko bizio atseginek degrada zaitzaten. Arrazoi bat zenukete gauzak pazientziaz jasateko eta anitz gauza kemenez egiteko. Hala ikusia dut indiarren artean.

—Ez diat dudarik —esan zuen Mustafa Mondek—. Baina gu ez gaituk indiarrak. Gizon zibilizatu batek ez zeukak ezer desatseginik jasan beharrik. Gauzak egiteari buruz, berriz, Fordek ez dik nahi gizon zibilizatuari buru-

tik ere pasa dakion holako ideiarik. Gizonak beren kontura obratzen hasiko balira, ordena sozial guztia hankaz gora letorkek.

—Eta zertan geratzen da orduan nork bere burua ukatzea? Jainkoaz sinetsiko bazenute, arrazoi bat zenukete zeuen buruak ukatzeko.

—Baina zibilizazio industriala buru-ukatzerik ez denean bakarrik duk posible. Buru-asetzea duk beharrezko, higieneak eta ekonomiak jarritako neurriraino. Bestela gurpilek pot egingo liakete.

—Arrazoi bat zenukete orduan kastitaterako! —esan zuen Basatiak masailak gorrizkatzen zitzaizkiolarik hitz hauek esatean.

—Kastitateak, ordea, grina dik, kastitateak neurastenia dik. Eta grinek eta neurasteniak ezoreka zekartek. Eta ezorekak, halaber, zibilizazioaren hondamena. Zibilizazioak ez zeukak iraunkor izaterik, bizio atsegin pila on bat gaberik.

—Baina Jainkoa duzu zer noble, eder eta heroiko guztien arrazoi. Jainko bat bazenute zuek...

—Ene lagun gazte eta maite —esan zuen Mustafa Mondek—, zibilizazioak ez dik inolako nobleziarik ez heroismorik behar. Bi gauza horiek inefikazia politikoaren sintomak dituk. Gurea bezala ganoraz antolaturiko gizarte batean, inork ez dik aukerarik txikiena noble eta heroiko portatzeko. Gauzak gaizki jarri beharko eta baldintzak arras egongaitz bilakatu beharko, aukera hori sortu ahal dadin. Gerrarik den lekuan, leialtasun bikoitzik den lekuan, eutsi beharreko tentaziorik den lekuan, burrukatu edo zaindu beharreko maitagairik den lekuan, han bai, bistan zegok nobleziak eta heroismoak badutela zer eginik. Baina orain ez zegok gerrarik. Behar diren kontu guz-

tiak jartzen dizkiagu inork inor maiteegi dezan eragozteko. Hemen ez zegok bi leialtasunen edo zintzotasunen artean hautatu ahal izaterik. Hala egokiturik zeudek denak, non ez baitute egiterik egin behar dutenaz besterik. Eta egin beharrekoa hain duk atsegin, hainbeste berezko joera lasai ager zitezkek, non egon ere ez baitago eutsi beharreko tentaziorik. Eta inoiz deskuidoz, ezer okerrik gertatuko balitz, hor zegok beti soma, errealitatetik bakazioak hartzeko aproposa. Hor zegok beti soma, gure amorrazioen barregarri, etsaiekin adiskidearazle, jasankor eta pazientziatsu eginarazle. Lehenago ahalegin handiak edo urteetako entrenamendu moral gogorra behar hituan honelako gauzak lortzeko. Orain, ordea, irentsi itzak bizpahiru gramo erdiko garau, eta kitto. Orain edonor zitekek birtutetsu. Nork bere moraltasunetik erdia gutxienez poltsikoan eraman zezakek, frasko baten barruan. Malkorik gabeko kristautasuna: horixe duk soma.

—Baina malkoak beharrezko dira. Ez al zara oroitzen Otelok dioenaz? «Ekaitz bakoitzaren ondoren honelako barealdiak etortzekotan, ari bitez puzka haizeok heriotza iratzarri arte». Bada istorio bat agure indiar batek kontatzen ziguna, Matsakiko Neskatxari buruz. Harekin ezkongura ziren gazteek goiz bat egin behar zuten haren baratzan aitzurketan. Erraza zelakoan; baratza hura, ordea, euli eta eltxo sorginez josia egon. Gazterik gehienek ezin inola ere zistadei eta erresuminari eutsi. Baina eutsi ahal izan ziena, huraxe ezkondu zen neskatxarekin.

—Ederra duk oso. Baina herri zibilizatuetan —esan zuen Inspektoreak— aitzurketan ekin gabe lor zitezkek neskatxak; eta ez zegok zast egiteko eulirik ez eltxorik. Duela anitz mende libratu gaituk horietatik.

Basatiak betosko zimurrez baieztatu zuen.

—Libratu omen zineten eulietatik. Bai, alajaina, horixe egiten duzue zuek. Desatsegin zaizuen denetik libratu, sufritzen ikasi beharrean. *«Nobleago da, ordea, zorigaitzaren harrikadak eta zastadak nork bere àriman sufritzea, edo armak jasorik, branka ematea atsekabezko itsasoari eta garaile ateratzea…»*. Baina zuek ez duzue ez bat ez beste egiten. Ez sufritu ez eutsi. Harrikadak eta zastadak abolitu eta kitto. Errazegia da hori.

Basatia kolpera mututu zen bere amarengan pentsatuz. Hogeita hamazazpigarren solairuko bere gelan, Linda igeri ibili zen argi kantarizko eta losintxa lurrintsuzko itsaso batean, urrun, alde eta alditik kanpo, bere oroitzapenen, bere ohituren, bere gorputz atsotu eta puztuaren presondegitik kanpo. Eta Tomakin, Inkubagailuetako eta Egokimenduko zuzendari ohia, Tomakin hura oporretan zen oraindik, umiliaziotik eta oinazetik oporretan; Lindaren aurpegi ikaragarria ikusterik eta haren beso umel eta malmutzak lepo bueltan sentitzerik ez zuen mundu batean, mundu eder batean…

—Zuek behar duzuena —jarraitu zuen Basatiak— malkodun zerbait da, pixka bat aldatzeko. Hemen ezer ez zaizue ezertxo kostatzen. *«Hilkor eta koloka dena zoriaren, heriotzaren eta arriskuaren mende uztea, arrautza koskol baten truke baino ez bada ere…»*. Ez al du honek ezer balio? —galdetu zuen Basatiak, Mustafa Mondi begiratuz—. Eta utz dezagun aparte Jainkoa, nahiz eta, jakina, bai izan Jainkoak honela jokatzeko arrazoi. Ez al da liluragarria arriskuan bizitzea?

—Bai horixe —erantzun zuen Inspektoreak—. Noizik noizera beharrezko duk gizonen eta emakumeen giltzurrun gaineko glandulak kilikatzea.

—Nola? —galdetu zuen Basatiak ezer konprenitzeke.

—Osasun onerako baldintzetatik bat duk. Honegatik ezinbesteko jarri dizkiagu G.B.A.ren tratamenduak.

—G.B.A.?

—Grina Bortitz Artifiziala. Hilean behin. Organismoa adrenalinaz bustitzen diagu. Beldurraren eta amorrazioaren ordezko fisiologiko egin-egina duk. Desdemona hiltzeak eta Otelok hila izateak dituen zuzpergarri guztiak dizkik, eta haien eragozpenik batere ez.

—Niri, ordea, eragozpenak gustatzen zaizkit.

—Guri ez, ordea —esan zuen Inspektoreak—. Nahiago diagu gauzak aise egin.

—Nik ez dut, bada, aisetasunik nahi. Nik Jainkoa nahi dut, poesia nahi dut, benetako arriskua nahi dut, askatasuna nahi dut, ona nahi dut, bekatua nahi dut.

—Hitz batean —esan zuen Mustafa Mondek—, hik zorigabe izateko eskubidea eskatzen duk.

—Ederki, konforme —esan zuen Basatiak desafioka—. Zorigabe izateko eskubidea eskatzen dut.

—Eta horrekin batera, zahartzeko eskubidea, itsusi eta ahul izateko eskubidea, sifilia eta minbizia edukitzeko eskubidea, goserik bizitzeko eskubidea, zorrizto bat izateko eskubidea, bihar zer gertatuko ote den beldurretan beti egoteko eskubidea, tifusa harrapatzeko eskubidea, oinazepean bizi izateko eskubidea.

Isilaldi luzea eduki zuten gero.

—Eskubide horiek denak eskatzen ditut, bai —bukatu zuen Basatiak.

Mustafa Mondek bizkarrak uzkurtu zituen.

—Heure esku dituk, bada —esan zuen.

# HAMAZORTZIGARREN KAPITULUA

Atea erdi zabalik zegoen. Sartu ziren.

—John!

Bainugelatik zarata latz berezi bat etorri zen.

—Ezer gertatzen al zaik? —galdetu zuen Helmhotzek. Ez zen erantzunik izan. Beste bi bider entzun zen lehengo zarata latza. Isilik berriro. Gero klaskada batez, bainugelako atea ireki eta han agertu zen Basatia, zurbil-zurbilik.

—Hi! —hots egin zion Helmholtzek—. Hi ez hago ondo, John.

—Jatekoren batek kalte egin al dik? —galdetu zuen Bernardek.

Basatiak baietz.

—Bai, zibilizazioa jan nian.

—Zer?

—Eta kalte egin zidaan; gaixorik utzi ninduan. Eta gero —gaineratu zuen ahots apalagoz— neure gaiztakeria jan nian.

—Baina zer gertatzen zaik garbi? Oraintxe hengoen…

—Orain garbirik negok —esan zuen Basatiak—. Ziape pixka bat hartu diat ur beroaz.

Beste biek harriturik begiratu zioten.

—Nahi al duk esan, zera... apropos egin duala? —galdetu zuen Bernardek.

—Honelaxe garbitzen dituk indiarrak. —John eseri zen eta arnasestuka, esku bat bekokitik pasa zuen—. Minutu batzuetan atseden hartu behar diat —esan zuen—. Jota negok.

—Jakina, ez nauk batere harritzen —esan zuen Helmholtzek. Eta tarte baten ondoren, gaineratu zuen beste tonu batez—: Agur egitera etorri gatzaizkik. Bihar goizean aldegingo diagu.

—Bai, bihar goizean aterako gaituk —esan zuen Bernardek. Honen aurpegian aire berria hauteman zuen Basatiak, derrigorrezko etsipena, alegia—. Eta, aizak John —jarraitu zuen aurrerantz makurtu eta Basatiaren belaun gainean esku bat kokaturik—, atzo gertatua zenbat sentitzen dudan esan nahi nian. —Gorritu egin zen—. Lotsaturik negok —jarraitu zuen ahotsak dardar egiten ziola—. Zeharo lotsaturik negok...

Basatiak isilarazi zuen eta, eskutik oraturik, maitekiro estutu zion.

—Helmholtz ezin hobeto portatu zaidak —jarraitu zuen Bernardek, isilune baten ondoren—. Beronengatik izan ez balitz, ezin izango nian...

—Tirok, tirok —protestatu zuen Helmholtzek.

—Gaur goizean Inspektorea ikustera joan nauk —esan zuen azkenez Basatiak.

—Zertarako?

—Zuekin batera uharteetara bidaltzeko eskatzera.

—Eta zer esan dik? —galdetu zuen Helmholtzek.

Basatiak buruari eragin zion.

—Ezetz.

—Zergatik ezetz?

—Esperimentuak jarraitzea nahi duela esan dik. Baina bertan hil nadila —gaineratu zuen Basatiak bapateko amorrazioz—, bertan hil nadila horien esperimentu gai izanez jarraitzekotan. Ez horrelakorik, mundu guztiko Inspektore guztiengatik ere. Neuk ere bihar alde egingo diat.

—Nora baina? —galdetu zioten bi lagunek batera.

Basatiak sorbaldak uzkurtu zituen.

—Edonora. Berdin zaidak. Bakarrik egoteko lekura behintzat.

Guildfordetik beheranzko abioi-bidea Wey haranean zehar zihoan Goldamingeraino eta gero, Mildford eta Witley gainetik, Haslemere eta Portmoutherantz jarraitzen zuen Petersfielden zehar. Ia beronen paretsu, goranzko abioi-bidea Worspledon, Tonghan, Puttenham, Elstead eta Grayshott gainetik iragaten zen. Hog's Back eta Hindhear bitartean baziren puntu batzuk bide batetik besteraino distantzia bospasei kilometrotik gora ez zena. Distantzia hura ez zen nahikoa pilotu ezaxolentzat, batez ere gauez eta gramo erdi bat gehiago harturik joanez gero. Bazen akzidenterik franko. Eta batzuk gogorrak. Horregatik erabaki zuten beheranzko bidea kilometro batzuk mendebalerago aldatzea. Grayshott eta Tongham bitartean abiazioko lau faro zeuden bertan behera utziak Portsmouth-Londres antzinako bidea seinalatzen zutenak.

Putthenham eta Elstead bitarteko mendiska gailurreko faro zaharra hautatu zuen Basatiak ermitatzat. Eraikuntza zementu armatuzkoa zen eta baldintza ederretan zegoen;

erosoegi, beharbada, pentsatu zuen Basatiak lekua lehenengoz ikuskatu zuenean, ia luxutsuegi eta zibilizatuegi. Hala ere lasaitarazi zuen kontzientzia, bere buruari promes eginik alderdi txar haiek kitatuko zituela burudiziplina gogorragoz, garbialdi osoagoez eta zehatzagoez. Lehenengo gaua lo hartu gabe pasa zuen apropos. Orduak eta orduak eman zituen otoitzean, behin zeruari, zeinari Klaudio errudunak barkamena eskatu baitzion, behin Awonawilonari, zuñieraz; behin Jesusi eta Poukongi, behin bere animalia jagole arranoari. Noizik noizera gurutzean bezala zabaltzen zituen besoak eta hala luzaro edukitzen, pixkanaka gehituz zihoakion minari eutsiz, agonia dardarti eta alagarri bihurtu arte. Hala edukitzen zituen bere borondatezko gurutzaldian. Bitartean, hortzak estuturik eta aurpegia izerditurik, behin eta berriro zioen: «O, barka iezadazu! Garbi nazazu! Lagun nazazu ona nadin!» Behin eta berriro honela, minaren minez ia konortea galtzeraino.

Biharamun goiza iristean, Basatiak pentsatu zuen irabazita zeukala faroan bizi izateko eskubidea. Irabazita zeukan, bai, nahiz eta oraindik kristalak egon leihorik gehienetan, nahiz eta panorama polita ageri plataformatik. Zeren faroa hautatzeko arrazoia bera bilakatu zitzaion ia kolpera beste norabait alde egiteko arrazoi. Johnek han bizitzea erabaki zuen, zeren panorama hain ederra baitzegoen handik, hain berebiziko begiralekutik, iruditzen baitzitzaion jainkozko izaki baten gizakundea zekusala. Nor zen, ordea, bera edertasunaren eguneroko ikuspenaz gozatzeko? Nor zen bera Jainkoaren agerian bizi izateko? Zerritegi zikin batean edo lurpeko zulo ilunen batean bizitzea merezi zuen berak. Gorputz osoa konkor eta minbera zuela oraindik barteko penitentziaz, baina arrazoi ho-

nexegatik barrua indartsu sentituz, Basatia igo zen bere dorre gainera eta handik begiratu zuen egunsentiko mundu argitsu hartara, bizitzeko eskubidea bereganatua zuen mundura, alegia.

Iparraldean, ikustaldia, Hog's Back-eko mendi gangar kleratsuaz mugatua zen, eta horren ekialdeko partetik Guildford osotzen zuten zazpi etxe garaien dorreak altxatzen ziren. Berauek ikustean Basatiak keinu bat egin zuen; baina denborarekin haiekin bakeak egingo zituen. Alaitsuki ñir-ñir ari baitziren, edo bestela, erreflektoreek argiturik, beren atzamar argitsuez (jadanik Ingalaterran Basatiak beste inork ulertu ezin zezakeen keinu baten esanguraz) zeruetako misterio sakonezinetarantz seinalatzen zutelako.

Hog's Back-en eta farodun mendiska arbeltsuaren bitarteko haranean Puttenham zegoen: bederatzi solairuko eraikuntza, silo eta guzti, hegazti haztegi bat, Bitamina D-ko fabrika txiki bat. Faroaz beste aldean, Hegoaldean, aldapa luzeak ageri ziren sasiz jantziak zingiradi zabal baterantz jotzen zutenak.

Zingira hartatik harago, bitarteko oihanen gainetik, Elstead-eko hamalau solairuko dorrea ageri zen. Aire ingeles lanbrotsuan erdi galduak, Hindhead eta Selborne ikusgarri zeuden, han urrunean, urdin eta erromantiko. Baina ez zuen urrunera zekusanak bakarrik lilurarazten Basatia; bere inguruan zekusana ere berdin zitzaion liluragarri. Oihanak, otadi zabalak eta otabera horixkak, basapinaditxoak, zingira eta urtegi distiratsuak, beren urki eta sahats negartiekin, beren urlili eta ihintzekin: bazen han edertasunik ugari, eta Amerikako mortu lehorretara ohiturik zeuden begientzat liluragarria zen guzti hura. Eta gainera, bakardadea! Egunetan eta egunetan zehar ez

zuen gizasemerik ikusi. Charing-T Dorretik farora ordu laurden bateko hegaldia baizik ez zegoen; baina Malpaiseko tontorrak Surrey-ko eremu hau baino askozaz mortuagoak ziren. Londresetik egunero irten ohi ziren jendeak, Golf Elektromagnetikoan edo Tenisean jokatzera irteten ziren soilik. Baina Puttenham-en ez zegoen joskerarik; Riemann-lurgainekorik hurbilenak Guildford-en ziren. Loreak eta paisaia ziren bertoko erakargarri bakarrak. Beraz, etortzeko arrazoi onik ez izanik, inor ez zen etortzen. Aurreneko egunetan, Basatia bakarrean eta inoren eragozpenik gabe bizi izan zen.

Londresera heltzean gastuetarako eman zioten dirurik gehiena, bere ekiporako behar zituen gauzak erosten erabili zuen Johnek. Londresetik irten aurretik, Basatiak lika-artilezko lau manta erosi zituen, sokak, alanbrea, iltzeak, kola, erremintaren batzuk, poxpoloak (laster, ordea, sua pizteko ardatza berak egiteko asmoa zeukan), sukaldeko bateria pixka bat, bi dozena zakutokada hazi eta hamar kilo gari irin.

—Ez, ez dut nahi almidoi sintetikorik, ez kotoi hondakinezko irin artifizialik —ekin behar izan zion—. Nahiz eta oso elikagarriak izan.

Gaileta panglandularrei eta idiki artifizial bitaminatuari buruz, ordea, ezin izan zion dendariaren etorriari eutsi. Orain lata haiek ikusirik, bere buruari agirika ari zitzaion orduko geldokeriagatik. Zibilizazioko gai nazkagarriak! Inoiz ez zituela jango erabaki zuen, nahiz eta goseak hil. «Neuk hortzak erakutsiko zizkieat horiei», pentsatu zuen mendekati. Eta, bide batez, bere buruari ere erakutsiko zizkion.

Johnek kontatu zuen bere dirua. Geratzen zitzaion apurra negua pasatzeko adina izango zitzaion. Udaberria

etortzean, bere baratzak emango zion kanpoko mundutik aparte bizi ahal izateko lain. Bitartean ehizatik ere atera zezakeen zerbait. Ikusia zuen anitz untxi, eta zingiretan bazebilen ur hegaztirik franko. Berehalaxe hasi zen arku bat eta honentzako geziak egiten.

Lizarrak zeuden faro inguruan hazten eta gezi-kirtenetarako bazen han aldaxka zuzen eta ederdun urritzik. Lizar gazte bat eraitsi zuen lehenengo. Adar gabeko enbor leunetik, ia bi metro luzeko zati bat ebaki zion, azala zuritu zion eta, Mitsima zaharrak irakatsi zion bezala, kaparik kapa zur zuria kenduz joan zitzaion. Azkenerako han zeukan bere luzerako akuilu bat, tinkoa eta sendoa erdian, arina eta zaulia ertzetan. Lan hura egiteak atsegin bete-betea eman zion. Ez zuen alferrik pasa Londresen hainbeste aste alferkerian: ezer nahi zuenean ez zeukan botoi bati ematea edo krisket bat biratzea baizik. Orain, ordea, zein atsegina trebezia eta pazientzia behar zituen zerbait egitea.

Arkuari ia azkena ematen zebilela, ikaraz konturatu zen kantatzen ari zela. Kantatzen! Bere buruarekin kanpoko aldetik topo eginik, bere burua izugarrizko delituan harrapatu balu bezala zen. Gorri-gorri jarri zen, zeharo lotsaturik. Ez baitzen bera kantatzera edo dibertitzera etorri hara, baizik bizitza zibilizatuko kutsuari ihes egitera, bere burua garbitzera eta ontzera, lanaren bidez zorrak kitatzera. Penaz konprenitu zuen, bere arkugintzan buru eta bihotz ari zen bitartean, ahaztu egin zela bere buruari beti gogoratzeko zin egin zionaz: Linda gaixoa, bere harenganako gogorkeria erailea, haren heriotzako ohe inguruan harrak bezala barra-barra zebiltzan biki nazkagarriak, beren presentzia hutsez Johnen mina eta damua ez ezik jainkoak berak ere profanatzen zituztela. Zin egin zuen beti

gogoratuko zela, zin egin zuen etengabe arituko zela zor hura ordaintzen. Eta han ari zen bere arkua egiten eta kantatzen honelaxe, bai, kantatzen. Sartu farora, ziape potea ireki eta ura ipini zuen sutan irakiten.

Ordu erdi geroago, Bokanowsky sail bateko hiru nekazari Delta-Gutxiago kamioiz zihoazen Elstead-erantz, eta mendixka tontorretik harriturik geratu ziren gazte bat zutik ikustean faro lagatuaren aurrealdean, biluzik gerriraino eta bere burua zigortzen, korapilodun sokazko zartailu batez. Gaztearen bizkarrak marra gorriztatuak ageri zituen alderik alde zeharretara, eta odol xirristak zerizkion ildotik ildora. Txoferrak gelditu zuen kamioia bide bazterrean eta, bere bi lagunekin batera, aho zabalik geratu zen, ikuskizun harrigarri hartara begira. Bat, bi, hiru... Kontatu zituzten zigorkadak. Zortzigarren zartada ondoren, gazteak gelditu zuen bere zigorketa, oihan ertzeraino korrika abiatu eta okadaka eta barruak ere botaka hasi zen. Gero zartailua berriro hartu eta jo eta jo ekin zion: bederatzi, hamar, hamaika, hamabi...

—Ford! —marmartu zuen txoferrak.

Eta beste bikiak ere iritzi berdinekoak ziren.

—Erreford! —esan zuten.

Handik hiru egunera, han agertu ziren periodistak, putreak haragi ustelera bezala.

Egur berdezko su geldian sikaturik eta zaildurik, arkua prest zeukan ia. Basatiak fin ziharduen bere gezigintzan. Hogeita hamar urritz makila ebakiak zeuzkan, bakoitzari iltze zorrotz bana puntan gogorki sarturik. Gau batez Puttenhamgo hegazti haztegian sar-irten bat egin zuen eta orain bazeukan armada oso bat ere hornitzeko adina luma. Geziak lumaz jazten ziharduen hain zuzen, lehenengo kazetaria agertu zitzaionean. Isil-isilka, bere

zapata pneumatikoz jantzirik, gizona atzeko aldetik hurreratu zitzaion.

—Egunon, Mr. Basati —esan zuen—. *Orduoroko Irratia*-ko albistaria nauzu.

Suge batek zast eginik bezala, salto handi bat eman zuen oinen gainean, luma, gezi, kola eta pintzel airean zehar sakabanatuz.

—Barka —esan zion kazetariak, benetan penaturik—. Ez neukan asmorik... —kapelari eragin zion; aluminiozko kopadun kapela zen; errezeptore eta transmisore telegrafikoak zeramatzan bertan—. Barka iezadazu kapelarik ez eranztea —esan zuen— kapela hau astuntxoa baita. Beno, esan dizudanez, *Orduoroko Irratia*-k bidali nau...

—Zer nahi duzu? —galdetu zuen Basatiak betosko ilunez.

—Beno, naturala denez, gure irakurleei txit atsegin litzaieke... —Burua okertu zuen pixka bat eta lausenguka bezala ari zen irribarrez—. Zeure hitz bat edo beste, Mr. Basati.

Eta berehalaxe, erritozko mugimendu batzuez, gerri bueltan zeraman bateriari konektaturiko bi kable askatu zituen; era berean aluminiozko kapelaren ezker-eskuinetan lotu zituen; kapela-gailurreko erresorte bati sakatu zion eta antena bat disparatu zen airean; kapela ertzeko beste erresorte bati eman eta mueilezko jostailu bat bezala, mikrofono txiki bat atera zen, zintzilik dardarka geratzen zitzaiolarik sudurretik hamabost bat zentimetrora. Aurikular pare bat belarrietaraino jaitsi, kapelaren ezker aldeko botoi bati sakatu eta furrundatxoa entzuten zen. Eskuineko beste botoi bat biratu eta txistu eta klaskada estereoskopiko batzuek moztu zuten furrunda hura.

—Hizketan —esan zuen—, hizketan, hizketan...

Bapatean tinbre hotsa entzun zen kapela barruan.

—Hi al haiz, Edzel? Primo Mellon hizketan hemen. Bai, harrapatu diat. Mr. Basatik oraintxe hartuko dik mikrofonoa hitz batzuk esateko. Mesedez, Mr. Basati —Johni begiratu eta beste irribarre ezti bat egin zion—. Esaiezu gure irakurleei zergatik etorri zaren hona. Zerk eragin zintuen hain kolpera (hizketan, Edzel!) Londresetik alde egitera. Eta, jakina, esaiezu zerbait zigorrari buruz ere.

Basatiari dardara sartu zitzaion. Nola arraio jakin zuten zigorraren berri?

Basatiak harrigarrizko zehaztasunez obeditu zuen. Bost hitz bakarrik esan zituen, batto ere ez gehiagorik. Bost hitz, Canterburyko Artxitxantre Komunalaz Bernardi esan zizkion hitzak berak.

—*Hàni, sons éso tse-nà!*

Eta kazetariari sorbaldetatik oraturik, buelta erdi emanarazi zion (ipurdialde mardula ageri zitzaion gazteari), apuntatu ondo, eta futbolistarik onenaren indarrez eta trebeziaz, egundoko ostikada ezarri zion.

Handik zortzi minutura, *Orduoroko Irratia*-ren edizio berri bat zebilen Londreseko kaleetan zehar. «Orduoroko Irratiako kazetari bati Mr. Basatik ostikada bat ematen dio ipurdian», zioen lehenengo orrialdeko titularrak. «Harridura Surrey-n».

«Eta harridura Londresen ere», pentsatu zuen kazetariak bueltan, hitz hauek irakurtzean. Eta, okerrago zena, min itzela eman zion harridura, noski. Gosaltzerakoan, kontuz-kontuz eseri behar izan zuen.

Lankidearen ipurdiko eskarmentagarriaz beldurtzeke, beste lau kazetari etorri ziren farora arratsalde hartan. Basatiak gero eta gogorrago errezibitu zituen. Hauek ziren laurak: *Times* New York-ekoa, *Lau Dimentsioko Conti-*

*nuum* Francfurt-ekoa, *Fordtar Zientziaren Monitorea* eta *Delten Ispilua*.

Distantzia zuhur batetik eta ipurdi minduetan hazka eginez oraindik, *Fordtar Zientziaren Monitorea*-ko kazetariak hots egin zuen:

—Tenteltzar! Zergatik ez duk soma pitin bat hartzen?

—Ospa hemendik! —erantzun zuen Basatiak.

Besteak, pauso batzuk atzera egin eta berriro itzuli zen.

—Pare bat gramok gaitz guztiak uxatzen dizkik.

—*Kohakwa iyathokyai!*

—Mina asmaketa baizik ez duk.

—A, bai? —esan zuen Basatiak.

Eta makila sendo bat harturik pauso bat aurrerantz eman zuen.

*Fordtar Zientziaren Monitorea*-ko bidaliak arinari eman zion bere helikopterorantz.

Mementu hartatik gora Basatia bakean utzi zuten denbora batez. Helikoptero batzuk etorri eta hegan ibili ziren bere dorre gainean, non zer ikusiko. Johnek gezi bat jaurtiki zion gehien hurreratu zenari. Geziak kabinako aluminiozko azpia zulatu zuen; garrasi zorrotz bat entzun zen eta aparailua gorantz abiatu zen suziri bat bezala, motorrak ahal zuenik azkarren. Gainetikoek harrez gero errespetuz gorde zituzten distantziak. Goiko furrunda aspergarriari jaramonik egiteke (Basatiak Matsakiren Neskatxaren zaleetarik bat bezala zekusan bere burua, ekinkor eta euskor hegadun zomorroen artean) Basatia lan eta lan ari zen bere geroko baratzan.

Denbora, pixka baten ondoren zomorroak berak aspertu ziren, antza, eta hegan aldendu ziren. Ordu batzue-

tan zerua hutsik geratu zitzaion buru gainean, bai eta isilik ere, birigarroa izan ezik.

Sargori itogarria zegoen eta ekaitza gainean zen. Johnek aitzurketan eman zuen goiza eta orain lurrean etzanik zegoen atsedenean. Honetan Leninaren oroitza egiazko presentzia bihurtu zitzaion kolpera, presentzia biluzi eta ikugarria, ziotsala: «Ene maitetxo» eta «Besarka nazazu», zapata-galtzerdiak soineko bakar, lurrintsu... Mari urde! Baina... O, O...! Leninaren besoak lepo bueltan, bularrak artez, haren ezpainak... *«Betikotasuna geure ezpainetan eta geure begietan genuen...»* Lenina... Ez, ez, ez, ez! Basatiak salto handi bat eman zuen eta biluzik, zegoen bezala, korrika atera zen etxetik. Larrea hasten zen mugan otadi arantzatsu bat zegoen. Johnek otartera jaurtiki zuen bere burua eta bere desioetako gorputz guriaren ordez, besakada bat ote berde estutu zuen. Milaka ota mutur zorrotzek urriki gabe zistakatu zuten. John Lindarengan pensatzen saiatu zen; han zegoen gaixoa hitzik eta hatsik gabe, eskuak estutuz eta begietatik izugarrizko ikara zeriola Linda gaixoa, inoiz ez zuela ahaztuko zin egin zuena. Baina Leninaren presentzia zirika ari zitzaion. Ota muturren zauriz eta zastadaz ere, bere haragi tematiak Lenina desiatzen zuen, nahitaez egiazko zitzaiona. «Maitetxo, maitetxo... zeuk ere desio baninduzun, zergatik ez zenidan esaten?»

Zigorra iltze batetik zintzilik zeukan ate ostean, eskumende beti badaezpada, kazetaririk ager baledi. Amorrazio aldiak emanda, Basatia korrika itzuli zen etxera, hartu zigorra eta airean dantzarazi zuen. Korapilodun sokek ausiki egin zioten haragian.

—Mari urde! Mari urde! —ari zen oihuka, Lenina bera balitz bezala (eta, nahiz eta ez konturatu, zer etsipenez

desiratzen zuen Lenina zedin!), Lenina zuria, beroa, lurrintsua, lizuna balitz bezala, honela zigortzen zuena—. Mari urde! —eta gero etsipenezko ahotsez—: O, Linda, barka iezadazu! Barka, ene Jainkoa! Gaiztoa naiz, zitala naiz. Naiz... Ez, ez, Mari urde, Mari urde!

Hirurehun metroko distantziara, Darwin Bonapartek gordeleku bat kontuz-kontuz egina zeukan oihanean eta handik ikusten zituen Basatiaren mugimendu guztiak. Sentsoramako Filme Egileen Taldeko argazkilaririk onena zen bera. Haren pazientzia eta abilezia garaile atera ziren. Darwin Bonapartek hiru egun pasa zituen haritz artifizial baten enbor barruan eserita; hiru gau sabelez behera arrastaka larrean zehar, otadian mikrofonoak gordez, hareatza gris bigunean kableak ehortziz. Hirurogeita hamabi ordu egundoko neketan. Baina iritsi zen mementu nagusia, mementurik handiena noski, behinola gorila batzuen ezteiei plano estereoskopiko harrigarri haiek atera zizkienez geroztik. «Zoragarri —esan zuen berekiko, Basatiak bere ariketa hasi zuenean— Zoragarri!».

Bere kamera teleskopikoak arretaz enfokaturik eduki zituen, kolaz itsatsiak bezala beren objetibo mugikorrari; beste teleskopio indartsuago bat ezarri zien Basatiaren aurpegi amorratu eta bihurrikatuari lehen plano bat ateratzeko (miragarri!); pixka batean kamera geldoz filmatu zuen (efektu komiko bikaina, prometitu zion bere buruari); eta bitartean gozamen zitzaion haren zartadak, urrumak eta erneguak entzutea, filmearen hots bandan grabatuz zihoazenak; frogatu zuen anplifikazio txiki batek nola jotzen zuen (honela dudarik gabe, hobeto geratzen zen); tarte labur batean pozik entzun zuen birigarro baten kanta zorrotza ere; Basatiak buelta eman zezan zain zegoen, bizkarretan behera zerion odolaren lehen plano on bat

ateratzeko... eta hara berehalaxe (hura zortea!) mutil esanginak buelta eman zuela. Argazkilariak aukera guztian hartu ahal izan zion nahi zuen planoa.

«Beno, biribila izan duk» —esan zuen dena bukatzean—. Primerakoa!» Aurpegia xukatu zuen. Estudioetan ukimen efektuak erantsitakoan, biribila geratuko zen. *Zeroien amodio bizimodua* bezain ona ia, pentsatu zuen Darwin Bonapartek. Eta hori, ene Ford, ez zen berriketa!

Geroztik hamabi egunetara *Surrey-ko Basatia* estreinaturik zegoen eta Mendebal Europako kategoriarik handieneko sentsoramategi guztietan ikus, entzun eta uki zitekeen.

Darwin Bonaparteren filmeak efektu itzela eragin zuen berehala. Estreinaldi gaueko biharamun arratsaldean, Johnen mortu bakardadea kolpera urratu zuen hara iritsi zen helikoptero multzo handiak.

John aitzurketan ari zen bere baratzan; eta aitzurketan ari zen bere baitan ere, bere pentsamenduetako lurra iraulkatuz. Heriotza... Eta behin eta berriro sartzen zuen aitzurra... «Gure atzo guztiek argitu diete zentzugabeei heriotzarako bide hautseztatua». Trumoi sarkor bat ari zitzaion hitz hauen bidez orroka. Johnek palakada bat lur jaso zuen. Zergatik hil zen Linda? Zergatik permititu zuten bere gizatasuna apurka-apurka gal zezan, eta azkenez...? Hotzikarak hartu zuen Basatia... Eta azkenez *«musukatzeko haragitzar on bat»* Laiaren bizkarrean oina ipini eta ondoraino sartu zuen lurrean *«Nola euliak mutiko okerrei, hala gatzaizkie gu Jainkoei. Jolastearren hiltzen gaituzte»*. Beste trumoi bat; hitz hauek berenez ageri ziren egiazko; moduren batez, egia bera ere baino egiazkoago. Eta hala ere, Gloucester-ek berak ere «Jainko beti ongileak» deitu zituen. Gainera *«atsedenik onena loa*

*duk; eta hik maiz bilatzen duk; hala ere Heriotzaren beldur haiz, loa halakoxea delarik ere».* Loa besterik ez; «*lo egin, amets egin, akaso».* Laiak harri baten kontra egin zuen. Hura hartzera makurtu zen. «*Eta heriotzaren lo horretan, zer amets...?»*

Haren gaineko furrunda, burrunbada bilakatu zen. Zerbait jarri zen eguzkiaren eta beraren artean eta gerizpetan aurkitu zen John. Ikaraturik, begiak jaso zituen bere lanetik eta bere pentsamenduetatik. Lausoturik bezala begiratu zuen gorantz. Haren gogoa deslai zebilen artean egia bera baino hitz egiazkoagoen beste mundu hartan zehar, haren gogoa heriotzaren eta jainkotasunaren zabaldietan zehar zebilen artean. Jaso begiak eta aparailu hegalari pila ikusi zuen bere gainean, hur-hurrean. Oti bolada bat bezala etorri ziren, airean dilindan egon ziren, eta azkenez larrean kokatu ziren, bere inguruan. Otitzar haien sabeletatik gizonak ateratzen ziren beren lika-franelazko galtza zuriz, eta emakumeak (bero egiten baitzuen) beren shantung-azetatozko pijamaz, edo panazko galtza motzez eta mauka gabeko brusa txit eskotatuz. Bikote bana aparailu bakoitzetik. Minutu gutxiren buruan, dozenaka zeuden han, zutik, faro inguruan korru zabal bat eginez, begira, barrezka, beren argazki makina disparatuz, tximino bati bezala jaurtikiz kakahueteak, hormona sexualezko maxkagoma paketeak, gaileta txiki panglandularrak. Eta etengabe —zeren orain trafikoaren joan-etorria etengabea baitzen Hog's Back-en gainetik— haien kopurua ugarituz zihoan. Ameskaitz batean bezala, dozenak hogeiko, eta hogeikoak ehuneko bilakatzen ziren.

Basatia gordeleku bila erretiratu zen eta orain, piztia inguratu bat bezala, zutik zegoen faroko hormari atzea

emanez, ikara mutuz begira aurpegi haietara, bere senetik irtendako gizon bat bezala.

Norbaitek masailera zuzen jaurtiki zion txikle pakete baten zartadak atera zuen bere harridura hartatik, errealitatera itzularaziz. Min zorrotza eman zion eta kolpera itzarrik aurkitu zen, itzarrik eta amorrazioz beterik.

—Kanpora! —oihukatu zuen.

Tximinoak hitz egin zuen; barre-karkarak entzun ziren.

—Aupa gure Basatia! Aupa! Aupa!

Eta egundoko zalaparta hartan, oihu hauek entzun zituen Johnek: Zigorra, zigorra, zigorra!

Hitz hauen sugestioari obedituz, ate osteko iltzetik korapilodun sokazko zigorra hartu zuen Johnek eta airean dantzarazi zuen, bere borreroei amenazuka bezala.

Txalo hots ironikoa atera zen jendartetik.

John amenazuka hurreratu zitzaien. Emakume batek txilio egin zuen ikaraturik. Ikusmiratzaileen erreskada amenazua hurren hartu zuen lekuan koloka geratu zen, baina laster tinkotu zen berriro ere eta gogor eutsi zioten. Kopuruz askoz gehiago zirela jakiteak, Basatiak uste ez bezalako kemena zemaien ikusmiratzaile haiei.

—Zergatik ez nauzue bakean uzten?

Bazen haren haserrean halako nahigabe airerik.

—Nahi al duk magnesiozko almendra gazirik? —esan zuen, Basatiak aurrerantz segitzekotan, lehenengo kolpean hartu beharko zuen gizonak. Eta boltsatxo bat astindu zuen—. Gozo-gozoak dituk benetan —gaineratu zuen irribarre eztigarriz eta urduri samar—. Eta magnesiozko gatzek gazte iraunaraziko haute beti.

—Zer nahi duzue niregandik? —galdetu zuen aurpegi irribarretsu haiei bana-banaka begiratuz—. Zer nahi duzue niregandik?

—Zigorra! —erantzun zuten ehun ahotsek nahastuki—. Egik zigorraren ariketa. Zigorraren ariketa ikusi nahi diagu.

Orduan erreskada ertzeko alde bat oihuka hasi zen aho batez eta erritmoz:

—Zigorra!

Denek batera egiten zuten oihu; eta zalapartaz, orobatasunaz, eta elkartasun erritmikoaren sentsazioaz mozkorturik, bazirudien halaxe ekingo ziotela oihuka orduetan eta orduetan, ia sekulorun sekulotan. Baina hogeita bostgarren berresaldian, eten bat egin zen kolpera. Hog's Back-etik zetorren beste helikoptero bat segundu batzuetan geldi egon zen jendetzaren gainean; gero Basatia zutik zegoen lekutik metro batzuetara lurrartu zuen, ikusmiratzaileen eta bere arteko zabalgunean. Helizeen burrunbadak mementu batez ito zuen jendearen oihuketa; baina geroxeago, aparailuak lurra ukitu eta helizeak mututzean berriro hasi ziren oihuka lehen bezain gogor, ekile eta monotono: «Zigorra».

Helikopteroko atea ireki eta han agertu ziren aurpegi kiskalidun gazte beilegi bat eta neskatxa bat ondoren, pana berdezko galtza motzez, alkondara zuriz eta jockeyko txanoz jantzia.

Neskatxa ikustean, Basatia ikaratu egin zen; atzerantz egin zuen eta aurpegia kolpera zurbildu zitzaion.

Neskatxa irribarrez begira geratu zitzaion, dudazko, erreguzko, ia apaltasunezko irribarrez. Segundu batzuk pasa ziren; zerbait esaten ari bide zen, baina haren ahotsa

itorik geratzen zen beren errepikari ekin eta ekin zihardu-ten ikusmiratzaileen zalapartaz.

—Zigorra! Zigorra!

Neskatxak bi eskuak ezkerreko saihetsera eraman zituen eta haren aurpegi melokotoia bezain gurian saminezko eta desio gartsuzko aire estrainio bat ageri zen. Haren begi urdinek handiago eta argiago ziruditen. Honetan bi malko erori zitzaizkion masailetan behera. Berriro egin zuen hitz baina ezin entzun. Gero keinu azkar eta bero batez, besoak Basatiarengana hedatu eta pauso bat aurrerantz eman zuen.

—Zigorra! Zigorra!

Eta hara bapatean ikusmiratzaileek lortua zutela hain gogoko zutena.

—Mari urde!

Eta korrika abiatu zitzaion neskatxari, zoro bat bezala. «Mari urde» ulukatu zuen zoro batek bezala, eta gero joka hasi zitzaion bere korapilodun sokazko zigorraz.

Hezurretaraino ikaraturik, itzuli zen neskatxa, eman zion ihesari, baina tupust eginik, lurrera erori zen.

—Henry! Henry! —hots egin zuen.

Baina haren lagun beilegia helikoptero ostean ostendurik zegoen, badaezpada ere.

Beroaldizko eta pozezko irrintzi batez, korrua hautsi eta abiada konbergente bat hasi zuten erakarpen zentro magnetikorantz. Oinazea, izan ere, izugarrikeria liluragarria da.

—*Erre ezan, oi haragikeria, erre ezan!*

—O, haragia!

Basatiak hortzak karraskatu zituen. Oraingoan zigorra bere bizkarren gainera erori zen.

—Hil ezak! Hil ezak!

Oinazearen ikusteak sortarazi ohi duen izuaren lilurak arrastaturik, eta egokimenduak haiengan finkatua zuen kooperazio ohiturak eta orobatasun eta elkartasun nahiak eraginik, ikusmiratzaileak Basatiaren keinuen frenesia imitatzen hasi ziren, elkarri kolpeka Basatiak bere haragi errebeldea zigortzen zuen bakoitzean, edo belartzan, bere oinetan kiribiltzen zen zatarkeria-kume potxolo hura jotzen zuen bakoitzean.

—Hil ezak, hil ezak, hil ezak! —ziharduen oihuka Basatiak.

Gero, bapatean *«Uhuhu-Ahaha»* kantatzen hasi zen bat; eta berehala beste guztiek ere errepikatu zioten, eta denak kantari, dantzan hasi ziren.

*«Uhuhu-Ahaha»*, jira eta bira, elkar joka, zortzi seiko konpasean. *Uhuhu-Ahaha.*

Gauerditik gora zen azkenengo helikopteroak aldegin zuenean. Somaz horditurik eta hain frenesi sentsual luzez leherturik, Basatia lo zegoen, larrean etzana. Eguzkia oso goi zegoen itzarri zenerako. Apur batean etzanik segitu zuen, argitan keinuka, mozolo bat bezala, ezer konprenitzeke; gero bapatean, denaz oroitu zen. Begiak esku batez estali zituen.

Arratsalde hartan Hog's Back-etik honantz furrundaka zetorren helikoptero bolada hamar kilometro luzeko hodei trinkoa zen.

—Basati! —hots egin zuten lehenengo iritsi zirenek—. Mr. Basati!

Ez zen erantzunik izan.

Faroko atea zabalik zegoen. Sakatu eta sartu ziren barruko erdi itzalean. Gelako beste ertzeko arku batetik ikus zitekeen goiko solairuetara zeraman eskailera-hasiera. Eta

arkuaren giltzarripean, hain zuzen, bi hanka zeuden zintzilik.

—Mr. Basati!

Geldiro-geldiro, txit geldiro, bi iparrorratz bezala, hankak eskuinerantz biratzen ziren; Ipar, Ipar-Ekialde, Ekialde, Hego, Hego-Hegomendebalde; gero geratu egin ziren, eta segundu gutxiren buruan, berriro hasi ziren biraka, lehen bezain bare eta geldiro, ezkerretarantz oraingoan: Hego-Hego-Mendebalde, Hego, Hego-Ekialde, Ekialde…



Izan ote liteke gizarte perfektorik? 1932an imajinatu zuen Huxleyk mundu berri hau, utopia moderno bat, non ez dagoen goserik, ez beharrik, ez zoritxarrik. Dena dago antolatua, prestatua, bakoitzak du bere lekua eta pozik bizi da leku horretan. Hala ere, mundu bikain horretan gizakia ez da benetako gizaki: zoriona derrigorrezkoa baldin bada non da aukera, predestinazioak non uzten du askatasuna, grinarik gabe posible ote da artea? Gizarte futurista horrek, guztiz urrun eta irudimenezkoa izanik ere, askotan geurearen hainbat alderdi dakarzkigu gogora, Huxleyk sekulako zorroztasuna izan zuelako bai zientziaren bai politikaren norabideei antzemateko. Oso liburu gutxi idatzi dira hau bezain lazgarriak, izugarriak, erabat asmatua izan arren halako egiaren irudipena sortu eta irakurleari zer pentsatua ematen diotenak.

ELKAR

ISBN 84-7917-419-6

9 788479 174194